

EGILEA
**Jexuxmari Zalakain Garaikoetxea**
1947, Tolosa

Jexuxmari Zalakain 18/98 auzian epaitu zuten Egin egunkariko administrazio-kontseiluko kide izateagatik. 2007ko azaroaren 30ean espetxeratu zuten 8 urteko espetxe zigorra betetzeko. Espetxealdia, ia osorik, Palentziako Dueñas espetxean egin zuen. 2015eko irailaren 27an irten zen kalera.

Kartzelan egindako beste lan batzuk ere argitaratu ditu:

- **Kartzelako Kronikak**, *(Ataramiñe, 2016)*.
- Katalanetik euskaratua, **Azken Patriarka**, Najat El Hachmi *(Txalaparta, 2016)*.
- Katalanetik euskaratua, **Kale estua**, Josep Pla *(Igela, 2017)*.

---

AZALEKO IRUDIA
**Mikel Zarrabe Elkoroibide**
1959, Eibar

**www.literaturakoadernoak.org**

---



ISBN: 978-84-947954-3-5
LEGE GORDAILUA. DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL
SS-1289-2017

# - Hitzaurrea -

Liburu hau ez da biografia bat. Halaxe dirudien arren, datu biografikoak ere badituelarik eta batzuk oso xeheak, ez da zehatz-mehatz biografia bat. Horretarako beste hainbat datutan luzatu beharko nintzatekeen. Eta gainera ez dut uste biografia oso bat idazteko adina meritu dudanik (are gutxiago nik neuk nire buruaz idatzita), ez bainaiz ezertan bereziki nabarmendu Euskal Herriko historia gauza askotan buru-belarri ibili arren.

Liburu hau inmersio bat da, nire bizitzako itsasoan unerik zakarrenean egindako inmersio zintzoaren emaitza. Kartzelan nengoela (2007-2015) zurrunbiloaren begian murgilduta, nire baitarako bidaia askatzailea egiteko premia sentitu nuen erraietan, eta idatziz leundu nituen bidaia horren unerik garratzenak, min zorrotz eta erabakitzailea. *Krisia* esaten zaio gure kulturan antzeko une bati, eta halaxe da; bere adiera zuzenean krisia erabakitzeko unea baita.

Bizitzako astinaldi batzuen eraginez ahul samar iritsi nintzen Soto del Realera, gau malapartatu batean. Hamabost urteko borroka luzea egin ondoren UPVko atarian pankarta erreibindikatzaile bati eutsiz Irakasle Propioa erdietsi nahirik, geletara itzuli nintzen, baina ordurako Damoklesen ezpata buru gainean ez, bihotzean sartuta neukan zorrotz asko, eta gelatan egon gabe hainbeste denbora pasata, nire aldarteak jokaldi itsusia egin zidan, eta hasi orduko utzi egin behar izan nituen eskolak. Hain urte luze eta zalapartsuetan amestutako itzulera

korapilo bihurtu zitzaidan ezustean: nik banekien kondenatuta nengoela, bederatzi urteko kartzelaldia nuela zain, baina eguna heldu bitartean eskolak prestatu beharra neukan, asignatura berri bati ekin behar nion zerotik hasita eta ez nekien garbi zein zen nire zeregina, pare bat hilabeterako zerbait arin prestatu edota, kartzelara joateko eguna noiz iritsi zain egon ordez, eskuartean neukan lanari ekitea. Kontuak kontu, ez nuen eustea asmatu eta psikiatrarenean amaitu nuen. Zainketa amaitu baino lehen geratu ninduten maderoek nire Santutxuko kalean bertan, eta gauez iritsi ginen kartzelaldiaren hasierako bizitoki izango nuen Soto del Realera. Forro polarreko patriketan ondo lo egiten saiatzeko pilulak neramatzan, ordea.

Behin barruan *instalatuta*, eta bigarren graduan sailkatua, nire kartzelaldi osoko unibertsoa izango zen Palentziako Dueñasera *destinatuta*, aise lortu nuen arren egoerari buelta ematea, barrura begirako bidaia egitea erabaki nuen, ez dakit denbora hobeto baliatzeko terapia modura, behingoz nire burua hobeto ezagutzeko asmoz, edo bietarako. Bidaia horren emaitza duzu liburu hau.

Pudore handiarekin egindako *strip-tease*a da, irakurtzeko pazientzia hartzen baduzu konturatuko zarenez. Behar bada liburu hau niretzat gorde beharko nukeen, baina zer arraio, unerik txarrenean krisiak nola gainditzen diren (nik nola gainditu nuen, bederen) azaldu beharra sentitu dut eta, hemen dago atrebentzia ez bada, *Ataramiñe* argitaletxeak argitaratuta.

Bi zatitan ebaki dut liburua. Lehenengoan, *Matazaren hari ezkutuen peskizan* izenekoan, umetatik hasi eta hogeita lau urte

bitartean bizi izandako bizikizunen errepasoa egin dut, gero-ra korapilo bihurtuta, nola askatu ez nekiela desesperaturik, gertakarien hari-muturrak non demontre ote zeuden bila ibili bainintzen errukirik gabe, ahalik eta argirik zorrotzena proiek-tatuz bizitzaren zoko-mokoetan. Horrek azaltzen du zergatik den bigarrena baino aise luzeagoa.

Bigarrenean, *Zurrunbiloaren begian* izenekoan hain juxtu, nire bizitza publikoan nik neuk izandako sentsazio transferiezinak eman ditut; ez ditut *Egin*eko urteak zehatz-mehatz arakatu, ez *Euskaldunon Egunkaria* sortu aurreko lanaldiak edota Irakas-lego Propioaren borrokaldian bizi izandakoak UPV-EHUn. Gauza horiek denak, ia denak, kontatuta daude, eta ez dut ezer errepikatzeko premiarik ikusi, ez eta nire begietatik begi-ratuta ere; beraz, alor horietan denetan nik neuk, eta nik neuk soilik, pentsatu eta esperimentatutakoa ekarri dut orriotara. Eta hori, ez historiaren hutsuneak betetzen laguntzeko, baizik kartzela-garaian bizi izandako krisia esplikatzeko egoki iritzi diodan neurrian soilik. Badira gainera espresuki kontatu nahi izan ez ditudan gauzak, inori kalterik ez egiteko edota euren bizipenak agerian ez jartzeko, ez baitaukat eskubiderik inore-nean baimenik gabe sartzeko.

Barka bezate, beraz, hainbat kontu ilunpean utzi ditudala uste dutenek edo, aukera-aukeran, nahi baino laburrago idatzi du-dala irizten diotenek.

*Errezel berdeak* liburu honek badu beste maila bat, niretzat oso kuttuna eta testu osoa zeharkatzen duena, kartzelako bizipe-nak hain zuzen. Testu-zati horretan zortzi urtetan nik neuk

neuretzako idatzi nuen egutegi bateko zatiak eman ditut, mamitsuenak iruditu zaizkidanak, besteak bazterrean utziz testua gehiegi ez luzatzearren batzuetan, gaiarekin zerikusirik ez dutela iritzita beste batzuetan. *Ataramine*k argitaratu zidan *Kartzelako kronikak* deritzan liburuxkan jasota daude gehiago.

Kartzela espektakulu bat da, ikuskizun hitsa, tristea, gordina, literatura gustukoa dugunontzat gai agorrezina. Preso arruntak edo sozialak deritzogunekin harreman zintzoa edukitzen saiatu izan naiz barruko urteetan, gauza asko gordetzen ditut, beraz, nire golkorako. Edozein moduz han ezagututako hainbat lagun, adiskide ez baina oso hurbileko izan ditut, eta ahantzezinak zaizkit. Zoritxarrez euren bizitzak isilean gordeta daude kontzertinez hesitutako harresien barruko aldean, eta han bidegabekeria handiak gertatzen dira testigurik gabe. Niri dagokidanez ere beude oraingoz isilean.

*Santutxu, 2017ko udazkenean*
**Jexuxmari Zalakain**

# -I-

Mutiko politta zen. Hola gogoratzen du, esaten ziotela, eta berak ere hala onartzen zuela. Mutiko ile horia eta begi urdinduna. Argala eta dotorea.

Jaio orduko hasi zen sufritzen, oinaze hartaz gogoratzen ez den arren. Amak azaldu ziolako daki, berari gertatu zitzaiola. Edozein ume bezala mutiko politta negarrez jaio zen, baina, itxuraz luzaroan jarraitu zuen negarrez, etsi gabe. Zer zela eta zer ote zen, lorik ez omen zuen egiten, amari berea eragotziz. Gaitzaren jatorria ezezagun, mutikoak ez zuen sendabiderik. "Hau har ezan", "hau emaion", mutikoak negar batean jarraitu zuen hilabetetan, beti amaren magalean, biluzik, bere larru gorrituak ez baitzuen ezein arroparik edo oihalen ukiturik bakean jasaten.

Horrela, asteak eta asteak eman omen zituen amak, mutikoa altzoan hartuta, oheratu gabe, harik eta noizbait medikua ez zen norbaitek azaleko gaitza, lehenago arintzen eta gero desagertzen, asmatu zuen arte. Emakume baserritar bat izan omen zen, izenez Graziosa, amari esan ziona: "aizan, ezagutzen dinat ukendu bat gaitz horretarako aproposa; emaion egunean hiruzpalau aldiz, igurtzi, eta ez garbitu. Utzi ukenduari bere lana egiten eta sendatuko zain haurra". Amak ez omen zuen halako belar-mantarretan federik, baina ordurako gutxiago medikuengan, beraz, hain zegoen nekatuta eta abailduta, hain zituen mutikoaren negarrak eta zotinak burmuinean iltzatuta, hainbesterainokoa zen asteetako logalearen zama, onartu egin zuen azkenean andrearen erremedioa.

Etorri zen baserritarra etxera, eman zion lehen igurtzia bere esku laztuekin, antzeman zuen amak haurtxoaren lehen atsegin-keinua, eta sinesten hasi zen badaezpada. Itzuli zen atsoa bere baserrira, jarraitu zuen amak belar-ukendu hura mutikoaren gorputzean zabaltzen, eta egun batzuen buruan, mutikoak ez zuen negarrik egiten, onartzen zituen jantziak, ahal zen zapitan bildua izatea, eta amak behingoz bere ohantzean etzatea lortu zuen. "Igurtzi haren eraginez, halako batean, azaleko oskola erori zitzaizun, eta berriro jaio izan bazina bezala izan zen. Txuri-txuri atera zinen zolda haren azpitik, ordura arte begiak eta beste zuloak baino ez baitzenituen agerian, eta kitto azaleko madarikazioa eta negarrak", esan ohi zion amak urte batzuk geroago, mutikoa gizonduta.

Auskalo nolakoak izan ziren amaren burutazioak egun luze eta gau luzeago haietan guztietan. Otoitz egingo zuen, seguru, zertan ote zen errudun galdetuko zion bere buruari, aurretik bi neska puska arazorik gabe ekarri ondoren zer arraio egiten ari zen gaizki pentsatuko zuen, mutikoa magaletik erortzeko arriskuaren beldur begiak bildu ezinik. Mutiko polittak dakiena da —amak esanda, jakina— amak zerbait agindu ziola Lezoko Santokristori, alegia, haurra sendatuz gero ahuspez jarriko zela haren oinetan, graziagatik eskerrak emanez, edo antzeko zerbait. Mutikoak ez dakiena da, ez du sekula garbi jakin, amak agintzari hura betetzerik izan zuenetz, irudipena du inoiz aitortu ziola amak baietz joan zela, eta halako zerbait susmatzen du orain oroimenaren tolesetan itsatsita, biriketan mukiak nola, baina, bestalde, apustu egingo luke ezetz, ez zuela betetzerik izan bere hitza. Izan ere, aitarik gabe ama ez zen inora mugitzen, eta aita ez zen urrutira joan zale, Lezo berriz, etxetik urrun samar zegoen garai hartan. Ez zela joango uste du mutiko polittak egiatan, zeren, amak beste inoiz kontatu zionez, Arantzazura joateko gutizia izan zuen betidanik; aitak baietz, igoko zuela esan omen

zion behin, besoetan hartuta: "elkarrekin joango gaitun, tuntuna, ez kezkatu, Amabirjinari otoitz egingo zionagu eta Goiko Bentan bazkalduko dinagu goxo-goxo…". Baina maitasunaren garretan eta gerora hainbat aldiz errepikatutako hitzak ezerezean gelditu ziren. Pena horrekin hil zen ama, gazterik, hirurogeita hiru urte baino ez zituela, Arantzazura joaterik izan ez zuelarik. Beraz, atera kontuak, aitak bere hitza betetzeko gauza izan ez bazen, hagitzez gaitzagoa izango zitzaion amarena kitatzea.

Gurasoak baserritarrak izan zituen mutiko polittak, euskaldun peto-petoak. Familia ugariko haurrak biak —zazpi mutil eta bi neska aitaren aldetik; zazpi neska eta bi mutil amarenetik—, ez zuten baserrian geratzerik izan. Ama gazterik jaitsi zen hirigunera, markesaren etxera, haren zerbitzura, hamalau urte baizik ez zituela. Asko ikasi zuela zioen amak. Sukaldari iaio atera zen ama aitarekin ezkontzeko, etxeko lanetan ezin trebeago. Markesarenean —mutikoak inoiz ezagutu zuen etxalde hura, hirigintzaren premietara bota eta dorreak altxatu baino lehen—, den-dena eskuz egin beharra zegoen. "Goiz hasten ginen lanean, egunsentiarekin: oheak egin, janaria prestatu, loreak zaindu, arropak garbitu, lisatu eta almidoitu; eta zailenetan zailena, egurrezko zoruak ezkoztatzea zen, bizkarra makurtuta, belauniko, ezkoari eta trapuari eragin eta eragin, korridore luzeak, gela ugariak eta eskailera handiak distiratsu utzi arte".

Politt-politta izan zen amatxo, gogoan du mutikoak, senideen artean polittena behar bada. Ezkontza aurreko argazkiren bat edo beste ikusiak ditu, urtetan gorde ere bai lagunei harro asko erakusteko, eta haren arabera pertxenta izan zen ama gaztetan, oso hazpegi lirainekoa, gorputzean emetasunaren leuna zeukana. Hamalau urterekin, kasik umea izango zen, begirada urdin hezea, pixkatxo bat tristea lekuko.

Aitak gehiago iraun zuen baserrian, soroan artajorran, belarra ontzen, ganadua gobernatzen eta gaztaina biltzen mendi-basoetan, beti aitaren aginduetara. Kontatzen zuen garai hartan bazegoela baserrian denontzako adina janari, eta beraz, ez zutela goserik pasatu, bederatzi haur izan ziren arren. Bazkalorduan, nonbait gurasoen inguruan denak mahaiaren bueltan eserita, ontzi bakarretik jaten omen zuten koilara babarrunetan edo zernahi lekaritan sartu-irten. Hala ere, agudo ibili behar izaten omen zen, halabeharrez, zeren aitak —aitonak, alegia— txandaka upategira bidali ohi baitzuen seme bat, sagardo botilaren bila. Sukaldetik upategira eta upategitik sukaldera bidean, eltzekariz hustuta geratzen baitzen lapikoa, joandakoaren partea beste guztien artan irentsita. Beraz, janaria ordezkatu beharra zegoen, galdetzen zitzaion bakoitzean aitak barrez azaltzen zuenez, eta hala, upategira jaitsitakoak bazekienez gorakoan mokadurik gabe geratuko zela, jaitsi baino lehen egundoko koilarakadak ahoratuz, eta jaitsita pitxar bat sagardo barruratuz moldatzen zen; mokadu mardulik ezean, gutxienez tragoa. Hura omen zen senideen legea!

Gero gerra etorri zen, eta akabo komeriak! Fusila hartu eta frontera joan behar izan zuen aitak soldadu izateko adinik gabe, beste anaia zaharragoen atzetik, nora eta zergatik ez zekiela, reketean hala ere, herri bereko beste batzuen kontra tiro egitera, berea ez zen gerra batera, berak aukeratu gabeko aldera. Edozein moduz osorik itzuli zen halako batean, gerra bukatu arren beste bi urtez derrigorrezko soldaduska burutu ondoren. Anaia zaharrenak baino suerte hobea izan zuen inondik ere. Mutikoak sakon josita gorde du beti osabari gertatutakoa. Aitak kontatuta daki osaba Arrasate aldean zebilela gudan, eta halako batean amonak, etxeko sukaldean harrikoa egiten ari zelarik, esan omen zuen: “Luis hil dute”. Hurrengo egunean, egunsentiarekin, baserriko ate nagusitik sartu zuten premua zerraldo, konpainiako hainbat gaztek bizkar hartuta. Irratirik ez zuten base-

rrian, aitzitik amonak bazekien seme zaharrenari gertatutakoa, nola jakin zuen misterioaren lausoan geratu den arren. Otoitz egin omen zuen amona Eleuteriak, eskuak amantalean xukatuz.

Gerra bitarteko permisoren batean ezagutu zuen aitak ama. Dantzaldiren batean edo kaletik paseatuz ezagutuko zuten elkar, auskalo. Aita gazte segaila zen, mutil zardaia, itxura onekoa, apala eta lanari emana bizitzen zekiena. Arma-kontuak bukatu ahala ezkondu ziren. Kalera ezkondu ere baserrian ez baitzegoen guztientzat lekurik. Aita elektrikaria izan zen beti; hasieran inoren babesean han-hemenka lardaskatzen, gero paper-fabrikan, eta hantxe hartu zuen erretiroa, bere garaian, bost seme-alaba hazita. Ama, jakina, etxekoandre izan zen, hil artean. Eta eri, lehen alaba izanez geroztik, flebitis gaiztoak jota.

Kalera ezkondu zirela esan dugu, baserria utzi zutela biek alegia, baina bizitzeko eta umeak egiteko aukeratutako etxea ez zen ez kalekoetxe ez baserrietxe; ez bata, ez bestea. Aitaren baserritik hurbil zegoen, hori bai; Tolosa eta Anoeta arteko muga-mugan, ez bateko eta ez besteko. Hantxe jaio zen mutiko politta, eta hiru arrebak ere bai. Bi izen zituen etxeak. Batzuek *Txatone* esaten zioten, baina *Vista Alegre* ere ba omen zen. Gurasoentzat eta haien sendian zein mutiko polittaren gomutan beti *Txatone* izan da.

Etxea bi etxebizitzakoa zen. Goikoan jaio zen mutiko politta, familia euskaldunean: behekoan familia kastellanoa bizi zen. Mutikoa ez da gogoratzen nolakoak ziren behekoak, haien izenak ere ez ditu gorde, neska-mutilik ba ote zen ere ez; agian, agian, gona baten firfira datorkio aldian behin burura. Ez daki familien artean harreman ona ala txarra zegoen. Oso abagune dramatikoan utzi behar izan zuten etxea, beherago azalduko denez. Edozein moduz, mutiko polittak

dio jaiotetxearen muga-izaera, bi hizkuntzen kontraesana, jatorriko bitasun hura dagoela bere izaera zalantzatiaren abiaburuan. Eta baliteke, nola ez!

Goiko familian, familia euskaldunean, lau haur jaio ziren. Mutiko politta hirugarrena zen, hiru nesken artean; bi aurretik, eta beste bat ondoren. Bost urte egin zituen bertan, menditik barrena ihes egin behar izan zuen arte, baina, hala ere, dituen oroitzapenak onak dira, zoriontsuak. Orain ez litzateke gauza izango etxe hura barrutik deskribatzeko, eta jada existitzen ez denez, inoiz behea jo zuelako, ez dago hura egiteko modurik. Etxea bakar-bakarrik zegoen mendimazelan, arboladi baten alboan. Inguruan ez zegoen beste etxerik. Leihoetatik errepidea ikusten zen, beherago etxearekin lotura egiten zuen estrata baten amaieran; eta errepidetik harago, erreka, zeruarekin muga egiten zuten mendixka batzuen oinetan. Etxearen bestaldean, goiko aldean, mendia, inoiz igo gabeko aldapa. Etxearen alde batean *zeharrartan* esan ohi zitzaion bidezidorra, hari jarraituz gero aitona-amonaren baserriraino zeramana. Urteak eman ditu mutiko politak konbentziturik zehar hartan hura bidezidorra izendatzeko modua zela, sinonimoa.

Etxebizitzan sartzeko maldatxo bat igo eta, gero, eskailera batzuk igo behar ziren, ateraino. Ate aurrean lorategi apaina zegoen beti, arrosaz beterik. Teilaturik gabeko etxea zen. Haren ordez, terraza bat, non trizikloz ibiltzen ziren haurrak. Ez zaio erraz ahaztuko mutiko polittari nola bigarren arrebari oinak pedaletan lotu zizkion eta nola bultzadaren eraginez terrazaren ertz-ertzean geratu zen neskatila goitik behera jausi gabe. Oraindik entzuten ditu bihotzaren taupadak belarri ondoan...

Etxea ia mendiaren kontra zegoen eraikita, bidexka bat tarteko, eta mendi-magalean gereziondo joria altxatzen zen. Zuhaitz hori geratu zaio mutiko polittari oroimenean ezer baino nabarmenago, haren fruitu goxoak, anpulu distiratsuak iduri. Haurrek ez baina gurasoek terrazatik har zitzaketen gereziak, zuhaitzera igotzen ibili beharrik gabe. Hura ere bota zuten ba noizbait, ordea!.

## Etxez etxe alderrai

Tupustean dena aldatu zen Txatonen. Ohikoak ziren euri-jasak, bai, baina 1953ko urte hartan gainezka egin zuen Oria ibaiak, inguru guztia gupidarik gabe inarrosiz. Haren burrunba bortitza ez zaio erraz ahaztuko. Haren zarata ez zen jada ibaia, betiko ur-korronte bizi eta xumea; uholde bortitza zen, olatu eta guzti orroka zetorrena, zuhaitz-enborrak, upelak, abereak, etxeko tresnak eta beste herrestan zekartzana, bazterretan kolpeka lehertuz. Umeak ziren anartean, eta ez daki zer gertatu zen doi. Ibaiak ez zeukan etxea irensterik ez harrapatzerik emaritik aski urrun baitzegoen, baina euriteak luizia egin zuen nonbait, eta mendi-mazelan eraikitako etxe hark ez zituen zimentarriak oso-oso sendoak izango. Zioten, beheko familiaren sukaldean zorua arrakalatu egin zela, eta goikoei abisu eman zietenez, zerbait erabaki beharra izan zuten gurasoek. Ez ditu gogoan zalapartak, ezbairik gabe egongo zirenak. Kontua da gurasoek etxea hustea hobetsi zutela, behekoek ez bezala. Haiek bertan geratu ziren urtetan, etxea berez erori zen arte.

Aitonaren baserria ez zegoen zinez urruti; beraz, gurdia ekarri zuten idi-pareak tiratuta. Etxeko puska guztiak lastari-zorroetan bildu eta

alde egin zuen familia osoak euripean: aurretik hiru haur zaharrenak —tartean mutiko politta, bost urterekin zaharra!—, gero gurdia, aitak gidatuta, eta azkena ama, alaba txikiena besoetan hartuta. Azkar iritsi ziren hiru haurrak baserrira, zehar hartan barrena, idiak baino arinago, alabaina ez zuten onik izan ama heldu arte. Oinez iritsi zen ama, lokatzetan, buruan patatak biltzeko zaku marroi sareztatua txano edo kapusai gisara ipinita, beso batean laugarren haurtxoa eta bestean kriseilua, etxe-atarian zintzilik egon ohi zena. Figura hura —ama lokatzetan baserrira iristen— exodo biblikoaren irudia begitandu izan zaio beti mutiko polittari, exodoaz aritzean beti ama ikusi baitu begien parean. Gainera, mutikoak hogei bat aldiz aldatu du etxea, bat utzi, beste hartu, ia beti patuak hartara behartuta, gaur arte; eta auskalo oraindik...

Bat-batean, bost lagun gehiago batu ziren baserrian. Seme bakarra geratzen zen aitaren etxean, bertara ezkonduta, bere familia aurrera ateraz etxaldeari jarraipena emateko, ordurako gainerakoak etxetik aterata baitzeuden, zein bere bidean, baserria utzi eta aldameneko hirigunera. Alabaren bat ere geratuko zen, gazteena behintzat bai, anartean nerabe. Bi seme gazteenak, berriz, fraide joanak ziren, eta beraz, haiek ez zuten lanik ematen, Jainkoaren esku zirelarik.

Mutiko polittak apenas gogoratzen du aitona Joxantonio: gizon garaia zen, argal-argala, zuztar hutsa, baserrian zaildua. Arrueren koadroetan antzeman du inoiz haren antzekorik. Gerora jakin du baserrigune hartako alkate izana zela, hiriguneko kondearen lorezain ibilia zela, eta handik zetorkiola familiari konde goitizena. Txatonetik baserrira iritsi zenerako aitona makal gaixorik zegoen, eta ez du zutik ezagutu, ohean etzanik baizik. Amona, berriz, andre zabala zen, lodi-sendoa, denetara iristen zen horietakoa. Urteak aurrera, hirigunera eraman zuten amona, seme nagusiarengana, bertan hil arte. Atsekabe izugarria du oraindik mutiko polittak, hura hiltzean

baimenik eman ez ziotelako haren hiletan presente egoteko. Baina horiek geroko kontuak dira.

Ez ziren luze egon baserrian. Hala ere hainbat gauza gorde ditu barru-barrun mutikoak: lehen-lehenik behien buruak ganbeletan belar-janean ate nagusia gurutzatu orduko; behin egurrezko eskailerak igota sukalde aurreko atari zabala, logelaz inguratua; handik goragoko ganbara misteriotsua —sagarrak, mizpirak, patatak, piperrak, gaztainak, txorien habiak eta zirin-sunda, zapore eta usain ugariz betea; etxe atzeko aska, non izenak soroko barazkiak garbitzen zituen arratsaldero, hurrengo egunean azokan saldu ahal izateko txukun prestatuz; eta eskola.

Orduantxe eskolatu zuten mutiko politta lehen aldiz. Bost urte ondo beteak zituen, eta arreba nagusiek zazpi eta bederatzi, hala ere eskolarik ez zuten ezagutu. Txatone urrun samar, eta isolaturik, baitzegoen edozein eskolatik. *Eskola txikiak* deritzan horietako bat izan zen mutikoaren lehen eskola, baserritik hirurehun bat metrora-edo: alde batean neskak, bestean mutilak. Mutilek frontoia zeukaten jolaserako; neskak soka-saltoan ibiliko ziren seguru asko. Jaiotza-etxean eta baserrian euskara hutsez aritzen ziren beti; eskolan, ordea, gaztelania besterik ez zuten ezagutu, hura baitzen, nonbait, eskolatuentzako hizkuntza unibertsal bakarra. Bake eta gatazka gabe, modu naturalean alegia, egin zuen mutikoak hizkuntza batetik besterako trantsizio behartua. Lehen eskola hartatik ez du oroitzapen txarrik; onik ere ez, egia esan. Beraz, gutxienez ez zen oso bortitza izango trantsizio hura. Maistra gogoratzen du, *señorita* alegia. Hainbat hari-mutur elkar lotuz gerora jakin du karlista hutsa zela andereño mutxurdin hura, eta guraso zein aitona-amonekin ez zela gaizki konpontzen, izan ere urteak aurrera, behin erabat kaletartuta, hari bisita egitera bidaltzen baitzuen aitak noizean behin kartilla batzuk tarteko. Xahar eta ezindurik, abegikor hartzen zuen haurra, ia-ia etxekotzat.

Aitaren baserriko egonaldi hartan geroko hainbat gauza azaltzeko balio dezakeen gertakari bitxia bizi izan zuen mutiko polittak eta familia osoak. Baserriko bi osaba gazteenak —adinagatik gerrara joan behar izan ez zutenak— fraide joanak ziren. Haietako bat apaiz izatera iritsi zen; bestea, aldiz, lego geratu zen. Ez bestea baino baldarragoa zelako, baizik hamabi-hamahiru urte zituelarik metro bat laurogei eta hamar zentimetro altu hazi, eta garai haietan —gerraondoan, alegia— seminarioan jateko aski ez zegoenez, ia beti gaixo eta makal egon zelako, eta ondorioz, latina eta bestelako gaiak ikasteko ezgauza, ondoezik eta abailduta. Hura ere mutil atsegina eta prestua izanik eta fraidetzarako ondo moldatua antza denez, agintariek lego jarraitzeko aukera hobetsi zioten eta, berak ongi iritzita, apaiz izateko gogoa baztertu behar izan zuen. Euskal Herria utzi eta oso gazterik bidali zuten, nora eta Erromara, bertan txofertza ikasi eta Oteizako Larraona kardinal nafarraren zerbitzura egokituz. Osabak berak gerora mutiko polittari konfiantzaz azaldu zionez, kardinalak ez omen zuen hegazkinez bidaiatzen, nahiago izan ohi zuen legoarekin autoan ibili, harat-honat, Europan zehar, Erromatik Lisboara, Lisboatik Parisera, handik Stockholmera edo Moskura zein Balkanetara, eta buelta Erromara. Osaba gidari zebilela errepideetan barna, kardinala lo joaten omen zen gehientsuenetan, lego gaztearekin hitz egin ordez; ilunabarretan, berriz, errosarioa errezatzea zuen gustuko, eta orduan osabak, gidatzeaz gain, errosarioa ere errezatu behar omen zuen, harik eta kardinala ostera lozorroan, osaba aintzazko eta oinazezko misterioak laga eta bidean kontzentratzen zen arte, helmugara onik eta garaiz heltzeko.

Bidaia sarri haietako bat izango zen, noski. Osaba baserritik gertu pasatuko zen gaztigua jaso zuten aitona-amonek, kardinalarekin, auskalo norako bidean. Baserria errepide nagusitik bostehun metrora zegoen arren, errepidera jaitsi behar izan zuten bertako de-

nek —mutiko politta ere bai, hantxe egon zen gainerako senideekin, kamino-etxe ondoan, osaba noiz iritsiko eta, bidebatez, ezagutzeko —nonbait denborarik gabe estu zetozen Erromako bidaiariak—; osabari txandaka musu eman —gizon luzea zen osaba, sotana beltzez jantzita zetorren, ilea motx-motxa, segaila, aitonaren irudiko —, eta etxerako bueltan, komentario garratz berbera zeukaten nagusi guztiek, euren solasean: ”baserriraino igotzea besterik ez zuten, bada, harainoko bidea txukun asko dago... baina etxea xumea nonbait gurea, elizako printze batentzat; hainbeste denbora etxetik kanpo egon eta gero bost minutu ziztrin ez sukaldean pixka bat lasai egoteko, aita-amak errepidera jaistera behartzen ibili gabe, dedio”.

Hala izango zen, segurutik, alegia kardinalari grazia gutxi egingo baitzion baserria ezagutzea, simaur-usainez kutsatzeko beldur behar bada, eta goikoen ohiturei jarraituz, nahikoa izango zela iritziko zion behekoei bedeinkapen-pare bat ematea, eta agian errosario batzuk banatuta. Baina osaba bera ere ez zen gehiegi saiatuko jaiotetxera igotzen, hura ere ohituegia baitzegokeen Erromako eliz jauregietara. Urte batzuk geroago frogatu ahal izan zuen mutiko polittak etxeko jende nagusiaren susmoak ez zirela irudipen hutsak. Ordurako Erroma utzi eta Parisen bizi zen osaba Espainiako emigranteen parrokietxe batean. Etxean hizkuntza gehien zekiena zen —gaztelaniaz aparte, italianoa eta frantsesa bai, behintzat—, eta halako prestigio lauso bat ere bazeukan osabak senideen artean, urruntze haren prezioa euskara ia erabat galtzea izan zen arren unibertsaltasun merkearen izenean. Etorri zen, bada, herrira halako batean —kalean bizi zen arrebarenean ostatu hartuta—, eta bertoko Amabirjinaren baselizara igo nahi izan zuen. Autoa hartu eta, mutiko polittaren arreba zaharrena lagun, gorako bideari ekin zion. Gainkalde hartatik osabaren baserria ikusten zen, beheko zuloan txuri-txuri, eta arrebak kontatzen zuen zur eta lur utzi zuela osaba ospetsuaren ateraldiak:

“Ez esan frantsesari beheko etxe horretan jaio nintzela”. Frantsesa, osabarekin bidaian etorritako laguna zen –emigranteen alaba— eta, itxura denez, ez zion aitortu nahi baserritarren semea zela, etxe xumeko haur, maizter-kumea. Hizkuntza eta jaiotetxea gutxietsiak; hara osabaren zerga! Edozein moduz, mutiko politta beti zorretan egongo da osabarekin; areago, bizitzaren une batzuetan euskarri bilakatu zitzaion osaba, beherago azalduko denez, eta aspaldi barkatu dio jarrera itsusi hura gizajoari.

Mutiko polittaren kalkuluen arabera, urtebete eskas egingo zuten aitaren baserrian, agian eskola-urte bat doi. Berak inoiz ulertu ez dituen arrazoiak tarteko —egia esan, galdetu ere ez ditu egin—, amarenean ziren konturatu orduko. Hirigunea eta baserrietxea lotzen zituen autobusean mugituko zen ostera familia osoa —berriro erromes— zortzi bat kilometro gorago. Aitak paper fabrikan lan egiten jarraitzen zuen —amak baserrian lagunduko zuen, noski—, eta haurrak beste eskola txiki batean hasi ziren, aurrekoaren baldintza bertsuetan, haur baserritar peto-petoekin gaztelania hutsean, beste maistra baten aginduetara. Elizan, aldiz —elizako ganbaran, zehatza izateko—, euskaraz jardun zuten kristau-ikasbidean trebatzen.

Amonaren baserrian aitona-amona, bertan geratutako osaba premuaren familia, beste izeba ezkongabe bat eta morroia bizi ziren. Baserri zabalagoa zen hura, lur- eta mendi-sail handiak zituena. Litekeena da aberatsagoa izatea —eta beraz, aiseago ekingo zioten sei senide berri elikatzeari—. Ukuilua aberez betea zeukan: behiak, bigantxaketa zekorrak; txerriak, oiloak, astoa, zaldia eta idi-pare ikusgarria (Gorri eta Moro) soroak goldatzeko, goiko mendietatik belarra jaisteko, etab. Ganbara alez mukuru eta sabaia belar onduz lepo zeuden beti. Aroztegi bat ere bazen han goian, osabak trebe erabiltzen zuena, baserriko lanetarako tresneria konpondu eta maiz egiteko.

Herri-kaskotik urrun samar zegoen amaren jaiotetxea, muino batean kokatuta herriguneari begira, aurrez-aurre, kilometro batera doi. Elizarako eta eskolarako bidezidor lokaztuari jarraitu behar zitzaion, oinez, garai hartan autorik ez baitzegoen baserrietan. Aldamenean beste baserri bat zegoen, auzo bakar, amarena baino aise xumeagoa, askoz ere zabarragoa. Hango nagusiak etxekoak baino hagitzez xaharragoak ziruditen, eta gutxienez bi seme gazte kankailu bizi ziren bertan, adinagatik edo dirua fabrikan irabazten zutelako, gurasoekin beti sesioan aritzen zirenak, etxeko lanei muzin egingo ziotelako-edo. Haietako batek, zaharrenak, Vespa edo *Lambretta* bat zeukan eta gau beranduan iristen zen maiz ttar-ttar-ttar bidezidorrean gora, txakurrak asaldatuz. Mutil gazteena, berriz, mutiko polittaren arreba batekin zaletuta zebilen, neska ikustean haren barretxo jostaria lekuko; arrakasta handirik gabe, egia esateko.

Agian beste urtebete edo ikasturte egongo ziren baserri hartan, harik eta hirigunean etxebizitza alokairuan hartuta, bertara aldatu ziren arte; beraz, sei urtetan lau etxe ezagutu zituen mutiko politak, patuak harat-honat erromesaldira bultzatuta, kokatzen zail. Markatuta itzuli zen, ordea, mutiko politta, baserrietxe hura zinez bere-beretzat betiko itsatsita, senean eta gogoan: orduak ematen zituen sukaldeko leiho txikiaren aurrean herriko baserriak zenbatzen eta haien izenak baitaratuz, buruz ikasten tematuta. Orixe irakurriz jakin zuen geroago haietako batean jaioa zela Santa Krutz apaiza.

Bihotzean eta hunkiduran ez ezik gorputzean ere markatuta utzi zuen mutiko polittak baserri hura kalera bidean. Bihurri samarra izaki, alegia, ez zuen bada kopetaz jo eta txikitu leiho txikiaren kristala! Leihoaren aldamenean jesartzen zen familia erromesa otorduetarako, eta halako batean, aulki gainean zutik txorakeriak eta imintzioak egiten zebilelarik, aitak egindako esku-keinuari itzuri, burua saihetsi

eta kristala birrindu zuen kopetarekin. Hango garrasi eta zalaparta sei urteko umemokoa odoletan blai ikusirik. Aitonak konortea galdu omen zuen biloba itsu geratuko ote zen beldurrez eta, nola edo hala odol-emaria moztuta, medikuaren zain geratu ziren baserrian, aita zurbil eta damu haurraren erreakzioa asmatu ez izanagatik. Mutiko polittaren oroimenak medikuarena zen motor baten zarata eta haren abiaduraren ziztua errepidean behera zetorrela dakarzkio orain ere. Hari beltzez josiko zion medikuak kopeta irekia, edo aluminiozko grapekin azala hartu, kontua da ez zuela lan txukunegia egin berrogeita hamabost urte geroago nabarmen baitago oraindik haren arrastoa kopetaren eskuineko aldean. Jaio ere markatuta jaio zen, ezkerreko masailean orin-orbainez hornituta; beraz, gazte-gaztetatik anitzez markatuta dator mutiko politta, edozeinentzat igarri-erraz.

Beste behin morroiarekin batera, asto gainean abiatu zen baserri aurreko bidetik auskalo nora. Astoa trostan jarrita, ordea, aberea pipertu eta putinka hasi zelarik, hara non mutikoa bere jesarlekutik eta morroiaren besoetatik askatu, aberearen buru gainetik hegan atera eta bidean ziplo geratu zen, gainean astoa eta astoaren gainean morroia, barrez lehertzen alua! Mutiko polittari ez zion grazia handirik egin, noski, belaunaren atzean oraindik igarri daitekeen ebakia lekuko, gako baten alanbreak ebakia. Aurreko bi markak gutxi iritzita nonbait, eskumuturra bihurritu zitzaion, arba batzuetan irrist eginda, harriko hormatxo baten gainetik salto eginik pasatzen saiatzean. Abagune hartan ezagutu zuen mutiko polittak petrikiloa zer den. Bazkalostean iritsi zen baserriko sukaldera. Gizon zabal, irribarretsu eta borobila zen, Aiherrako Mattin nola, brusa beltz luzea jantzita zetorren. Aurrean jesarrita —mutikoa hormaren kontra eta gizonaren hanka artean ihesbiderik gabe—, eskua eskatu zion, bihurritutako eskumuturra artatzeko. Benda askatzen zion bitartean solas gozoarekin bereganaturik umea, di-da batean manipulatu zion

eskumuturra —kri-kra—, sekulako oihua —bat eta bakarra— jaurtiaraziz mutiko polittari. "Kitto" baizik ez zuen esan petrikiloak, mutikoak bi negar-anpolai borobil-borobilak isurtzen zituela... Eskumuturrak ez du inoiz beste artarik behar izan.

Bizitzan zehar ahal izan duen bakoitzean igo izan da mutiko politta baserri hartara —sustrai-etxera?— umezaroko pasarteak oroitzera, bertako usainak berpiztera: ukuiluko simaurra, upategiko hezetasuna zirin-sunda eta urdaiazpikoen gatza, mandioko belar ondua, iluntzean segaz mozturiko bibelarraren lurruna, sukaldeko egur-enbor kiskalien epela, sagarren garraztasuna, gari-jotzearen hautsa; soinuak berrentzutera: gela-azpiko iturriaren tanta-hots etengabea siesta-orduan, ganaduaren burukadak eta arnaskera astuna; baserriko atarien joan-etorriak eta haietako bakoitzaren existentzia kokatzen zuten etxe-argien distira gau ilunean berrikustera.

Gurasoek hirigunean topatu zuten etxea ordurarte bizileku izandakoak ezbezalakoa zen. Hasteko, solairutan banatutako etxe altua zen, eta azken-aurrenean kokatu zen familia, ezezagunen artean —beheko pisu batean amaren neba kamioilaria bizi zen bere familiarekin—. Etxeak hiru logela, egongela, sukaldea eta komuna zituen —dutxarik eta bainurik gabea—. Tartean, korridore laburra. Zorua, egurrezkoa, zeinaren begietan kristalezko puztarri koloretsuak pausatzen zituen mutiko polittak. Gurasoak ez ziren gehiago handik mugitu; haurrak, bai, ordea, ezkontzeko, eta mutiko politta ere bai, berehala eta betiko. Hantxe jaio zen anaia gazteena, bosgarrena, ospitalean munduratzeko aukera izan zuen bakarra, gainerakoak Txatoneko sukaldean atera baitziren amaren sabeletik, emaginaren laguntzaz. Ordurarte mendiko etxeetan bizi izandako familia kaletartu egin zen, beraz, haurren heziketarako aukera hobeak erdietsiz, eta edozein moduz, behingoz bereburu bizitzen jarraitzeko ere bai.

Bi akademiatan ibili ondoren, monjetan hasi ziren neskak, eta fraideetan mutiko politta, erdara hutsean berriro ere, euskara etxerako eta senitarteko solaserako utziz. Bi sailetan banatuta zegoen fraideen ikastetxea: libreak, arratsaldean eskola-orduak bukatuta etxera joaten zirenak, eta bijilatuak, ikastetxean bertan geratzen zirenak debereak egiten, hango irakasle sotanadunen begiradapean. Azken horiek hiriguneko familia ahaldunen semeak ziren —alabak monjetan zebiltzan, jakina, haientzako ez zen gorengo eskolarako esperantzarik—, eskola gaindituta bertoko eskola teknikoetan eta, gutxi batzuek kanpoko unibertsitateetan. Mutiko politta libreetan aritu zen —besteak beste dohainik zelako—. Hiru irakasle ditu gogoan: bi laiko, maisu zeritzanak, jatorrak eta arduratsuak, biak Kantabriakoak, Don Adolfo eta Don Alfredo, ikasleei Santanderreko abestiak irakasten jarduten zutenak (*Santander, bella tierruca, viva Santander*); eta apaiz bat, mutikoaren izen berbera zeramana, sotanaduna garaiek hala behartuta, oso gizon bortitza, jenio bizikoa, astakilo hutsa, berotzen zenean haurrak zigorka ibiltzen zituena, zumitz berdea astinduz, borradorea burura jaurtiz, etab. Mutikoak dastatu zituen inoizko zaplaztada ezusteko eta basatiak. Misioetara bidali omen zuten gerora apaiz hura, beltzak edo indioak bezatzera nonbait. Azkar samarra zenez, arazorik gabe gainditzen zituen mutiko polittak eskolak eta mailak, ohartuz, ordea, zenbakiak ez zetozela bat bere aldarte eta zaletasunekin.

## Familia kaletartuta

Han, eskolapioetan, egin zuen bere lehen jaunartzea, zazpi urterekin (*Cantad oh puros niños, cantad hoy al Señor, de gratitud un himno de gratitud y amor*...), zuriz jantzita. Bere aldamenean desfilatu zuen hirigune-ko kaleetan zehar prozesio hunkigarrian, herriko musika-banda eta guzti, inguruko familia aberatsenetako baten seme gazteenak —txa-let izugarri ederrean bizi zen hura, besteengandik aldendurik—, jau-nartzeak gutxienez egun baterako denak berdinduz. Hala ere, beste fraide-klase batzuen elizan, korazonistetan, hasi eta jardun zuen me-za-mutil, eta goiz-goiz jaiki behar izaten zuen lehen meza laguntze-ko, goizeko seietan... Poz-pozik, antza.

Inoiz ahaztu ez zaion istripu galanta jasan zuen mutiko polittak ga-rai hartan, zortzi urte zituela. Bazkaldu orduko korrika batean joan ohi zen ostera ikastetxera, hango ateak zabaldu aurretik puxtarritan jolasteko. Errepidea zeharkatzean, bi aldeetara begiratu arren distan-tziak gaizki kalkulatuta, auto batek harrapatu zuen gurpilen artean. Zorionez mediku bat zen gidaria, eta bere klinikara eraman zuen umea arrapaladan. Ez zitzaion ezer larririk gertatu, kolpe astun bat baino ez. Esnatu zenean, etxeko ohean eserita topatu zuen medikua aurpegira so. Amarekin mintzo zen, eta ordura arte entzun gabeko hitz bat erregistratu du bere garunean: *escarmiento.* Istripuaren hotse-ra bildutako beste mutikoek esan zioten, alegia, kolpearen ondoren gurpilen albo-alboan geratu zela, haiek azpian hartu gabe, eta "nire zapata" oihukatu zuela, autoaren talka jaso eta konortea galdu au-rretik, nonbait oinetakoa galdurik. Berak hobeto gogoratzen ditu klinikako eskailera zuriak, nondik moja bat jaisten ari zen, abituaren alde batera, zintzilik, guraize handi bat eta giltza-mordoa zekartzana.

Aita elektrikaria, ama etxekoandre, nahikoa lan bazuten guraso haiek bost haur hazteko. Gurasoen anaiak eta arrebak, denak, baserrian geratutakoak eta fraide joandakoak izan ezik, inguruan bizi ziren, eta oro har, giro lasaia ezagutu zuen, gerora, urteekin, jakin duen arren, bazirela liskar isilak euren artean, ezinikusi gordeak, ez oso larriak, bestalde, oinordekotzari eta beste kontu batzuei atxikiak. Beti harreman gehiago eta hobea izan zuen amaren aldeko izeba-osabekin; edozein moduz denekin ondo konpontzeko, eta aldian-aldian dendenei bisita egiteko gomendioa egin zitzaion beti etxean. Eta halaxe saiatu da mutiko politta bere bizitzan zehar.

Aita futbolzalea zen, eta bosgarren haurra, bigarren mutila, artean jaio gabe, futbol-zelaira joaten ziren hamabostean behin elkarrekin aita eta mutiko politta, herriko taldea jokatzen ikustera. Igandeetako irteera hark bazuen bere errituala: etxetik atera eta taberna jakin batera joan ohi ziren biak; aitak kafea eta kopa hartzen zuen beste lagunekin, eta *faria* errez abiatzen ziren estadiorantz. Mutikoak bidean hartzen zuen asteroko oparia: barkileroarenean erruletari eragin, eta indarraren arabera lor zitekeen barkilu batzuk, piruli bat edota, suerte pixka batekin, karamelu gorriko txalupatxoa.

Bestelakoetan, mutikoaren etxean ez zegoen aukera apartekorik ez zaletasun markaturik. Futbolarien kromoak biltzen eta albuma osatzen —behin futbolean arauzkoak ziren larruzko baloia eskuratu zuen: gorri-gorria—, aldameneko beste mutil batekin kartatan jolasten, edo etxeko korridore laburrean puxtarriz edo plastiko gogorreko indio eta bakeroen artean ezinezko batailak antolatzen ematen zuen denbora librea. Arreba nagusiak, hiruzpalau urte zaharragoak, dantzak ikasten saiatzen ziren sukaldean amaren doinura.

Behin bizikleta urdin bat ekarri zuen aitak etxera —komunean gako batetik zintzilik gordetzen zuen—, eta hiru zaharrenei bederen ibil-

tzen irakasten saiatu zen arren, ez zuen arrakasta handirik izan, mutiko polittak bederen ez zuen ikasi eta, ausartegia ez zenez, lotsa izaten zuen tramankulu hartan ibiltzen ikasteko baldarra zela adierazteko eta, trebeegia ere ez nonbait, ez zen ikasten tematu.

Diru handirik ez zegoen etxe hartan —nola egongo zen!—, hala ere beti egon ohi zen opariren bat Erregetan —artean ez baitzen Olentzerorik ezagutzen, gabon-kantetan izan ezik—. Opari xumeak ziren, bai, baina batzuk ez ditu ahaztu mutiko polittak: egurrezko txantxo bat, harietatik tiratuz hankak mugitu eta tiradizoaren eraginez esku banatan zeuzkan platertxoak jotzen zituena; pandero bat, kartoizko esku-soinua; Errealaren ikurra eta jokalaria margotuta zeuzkan gorbata urdina, goma batez lepoa inguraturik janzten zena; mazapanezko sugea eta bestelako gozoki batzuk.

Haurtzaro labur hura erlatiboki zoriontsua izan zen mutiko polittarentzat. Etxean giro ona egon zen beti, auzo atseginak izan zituzten —orduz geroztik atsegin ditu platanoak, auzo-andreak ahal zuen guztietan ekartzen baitzion amari platano-sorta ederra bere biltegitik—, eta oro har arazo handirik gabe joan ziren urteak. Estutasunak gurasoek ezagutuko zituzten.

Gurasoen artean, bestalde, ez zen iskanbila handirik izango urte haietan, izatekotan gogoratuko baitzituen. Adibidez, ondo-ondo josita dauka gogoan euren arteko liskar txiki bat. Amaren urtebetetzea zen, eta aitak amantal bat, marra txuri-urdinduna ekarri zion. Amak ez zuen abegi onez hartu: espero ez zuelako, urduri samar eta artega zebilelako egun haietan edo, besterik gabe plastikozko amantal hura lanarekin lotu eta ezegokitzat joko zuelako oparitarako, batek daki. Kontua da, aitak sekulako etsia harrapatu zuela eta elkarri hitzik egin gabe egon ziren egun batzuk. Mutiko polittak ez zuen ongi ulertzen gertatzen ari zena baina, lehen aldiz bizitzan, erabakitzeko premia

nabaritu zuen bere baitan, gordin-gordin. Aita eta ama banantzekotan norekin geratu, alegia. Bataren eta bestearen alde zein kontrako arrazoiak pilatzen jardun zuen, norekin geratu ez baitzen erabakitzen samurra, erabakiak gurasoetako batekin geratu eta bestearekin moztea baitzekarren. Zorionez berehala egin zituzten bakeak, eta mutiko polittak ez zuen ezer erabaki beharrik izan. Eskerrak...

Ezin esan lagun handirik egin zituenik garai hartan, hainbeste urte joanda gero apenas gogoratzen du inoren izenik: Josetxo, Jose Luis, Migelmari —begien parean duen argazki sepiari begira jarri, eta apaiz basatiaren aldamenean azaltzen diren umeak berarekin gelan ibilitakoak direla bai, baina izenak ere ez ditu gogoan—; inoiz edo behin herrira itzuli eta kaleetan zehar dabilenean erabat arrotz sentitzen da haurtzaroko kale estuetan, hazpegi batek edo bestek baizik erakartzen ez diolarik garai urrun haietako gogorapen zehatzik. Holakoetan senideren bati galdetu behar izaten dio, hori zein da?. Etsairik ere ez zituen egingo, izan ere horren arrastorik ez baitu gorde. Aldiz neskatila polit-polit bat du gogoan oraindik, ezabaezin; hura bai. Apenas hitz egin zuten elkarrekin. Etxe oneko alaba zen hura mutikoaren iritziz, eta kontuz ibili beharra zegoen. Haren trentza airosoak, sudurtxo kuttunak, aurpegi guri-guriak, ibilera lirainak eta haren seriotasun zintzoak... hortxe diraute, gailen. Gazteegia zen inguruan gertatzen zenaz jabetzeko, alabaina aski zorrotza konturatzeko mutil zaharragoek ahopeka ziotena, alegia mutil eta neska batzuk *txiki-txaka* ibiltzen zirela, non eta etxe-atari ilunetan.

Fraide artean egin zituen, beraz, urte haiek mutiko polittak; batzuekin ikasi, beste batzuekin meza-laguntzaile eta beste hirugarren fraide-klase batzuengana jotzen zuen aitortza egitera, izan ere etxe ondo-ondoan baitzegoen fraide arantzazutarren komentua, eta haietako bat izan ohi zen auzoko neska-mutil gehientsuenen aitorlea,

ezpainetan beti irri, ahotsean goxotasun, kapa arrea umeen babesle. Liburuetan ikasi zuen geroko geroan, euskal literaturan norbait izandakoa zela fraide amultsu hura, Aita Garate.

Fraide batzuen edo besteen eragina izango zen, seguruen, auskalo, kontua da batzuekin eta besteekin probatu zuela, atsegin handiz koska eginda haien amua irentsiz. Bizitzaren misterioak, mutiko polita kartusiar izan nahi zuela esaten hasi zen gazte-gaztetatik, hamar urte ez zituela, ordura arte kartusiarrik ikusi gabe —hamazortzi urte zituela ikusi zuen lehenengo aldiz kartusiar bat Burgosko Mirafloresen—. Kartusiar ez kartusiar, San Inazio Loiolakoaren biografia irakurtzeko tema izan zuen luzaroan. Auto-istripua izan zuenean lortu zuen gurasoek erostea zorioneko biografia hura, baina ez dirudi osorik irakurri zuenik, lehorregia iritziz.

Meza-mutil egiten zuen elizan bazegoen fraide arratiar bat, Eugenio Undurraga, Txinan misiolari ibilitakoa, zeinak arratsaldeko *funtzioa* bukatu ostean —funtzioa esaten zioten ilunabarreko elizkizunari—meza-mutil guztiak bere inguruan bildu eta Txinako pasadizoak kontu-kontari jarduten zuen, bidebatez tartetxo hura asteko lanagatik sos batzuk banatzeko baliatuz. Atsegin zituen istorio haiek denak mutikoak, hala ere —erabaki aski harrigarriz edo ez hainbeste– fraide eskolapioek eraman zuten lehenik eurekin probatzera, eurentzako balioko ote zuen peskizan. Haiekin ikasi zituen lehen aldiz errege bisigodoen izenak, eta huno barbaroen zerrendak —mutikoen memoria probatzeko erabiltzen zituzten izen arraro haiek fraideek—. Etxetik irteten zen lehen hamabostaldia izan zen, ia-ia kanpaldi baten antzekoa, eta inoiz ahaztu izan ez duen beste gertakari bat bizi izan zuen Lizarran, arima eri utzi ziona betiko. Ibaira eraman ohi zituzten mutikoak aldian behin, arratsalde-pasa. Bainualdia bukatu eta gero inguruko soro batera alde egin zuen behin beste mutiko

helduagoekin —helduagoak zirenez ohituagoak ere bai, antza— eta madari-jasotzen hasi ziren. Hartu ez hartu ibili zen mutiko politta, ekintza hura bilketa edo lapurreta ote zen bereizi ezinik, edo okerrago zena, batere jaso ez zuen arren, kolaboratu ote zuenetz zalantzan, eta ondorioz, hura aitortu behar ote zen edo ez ezbaian. Lehen barne-borroka latza. Udaldia gaindituta etxeratu baino lehen aitorlekutik pasarazi zituzten ume guztiak —ohitura zelako, astean behin—, eta hor hasi zen mutiko politta aitortu ez aitortu, esandakoa aski izan ote zen edo ez kezkatuta, erabat garbi jokatu ote zuen ardurarik, gezurra esatea eta egia osoa ezkutatzea gauza bera ote zen, bekatuaren lehen sentsazio garratza dastatuz: kulpa, errua. Izan ere ordura arteko aitortza-gaiek —amaren esana ez dut bete, arrebekin haserretu naiz...— ez baitzuten bekatutik ezer, fraide gozoari astero esan beharreko letania erraza baizik. Egundo ez zaio ahaztu pasarte hura, arrasto ezabaezin bilakatu zaio zinez: bere nortasunaren joera zalantzatiaren abiapuntu edo agerkari, seguru aski. Kontzientziaren, eta geroko estutasunen piztuera beharbada. Hura bai marka zorrotz eta goria!

## *Kartzela-txokoan, beti erne (I)*

*Soto del Realen nago. Atzo eguerdian atxilotu ninduten hiru maderok etxe atarian. Mari agurtu gabe sartu naute autoan, eskuan neraman ogi-barra alabari ematera lagundu ondoren. Une horretan ez nintzen gogoratu poltsa bat hartu behar nuela, arropa pixka batekin. Eguerdiko ordu biak ziren atxilotu nindutenean, eta arratseko bederatziak aldera atera naute Gordonizeko komisaldegitik 18/98ko kide bilbotar guztiak atzeman ondoren. Ziztu bizian ekarri naute hiru kaputxatuk, eskubilurrak ipini gabe. Nora naramaten ez didate esan, baina Bilbo eta Burgos gurutzatu ditugunez, gutxienez Madrileraino, ziur. Bi aldiz geratu gara bidean; lehenengoz gasolindegi batean, maderoak atera dira kafea hartu eta autoa gasolinaz kargatzera, eta bakarrik utzi naute, jakinda eskuak lotu gabe neuzkala, patriketan. Nonbait ez naute oso arriskutsutzat hartzen. Bigarrenez, pixa egitera atera da taldeburu egiten duena, naramaten espetxea galdu dutelako, antza. GPSa ez omen dabil bizkorregi. (...)*

*Arropa kentzeko esan dit funtzionarioak, eta poltsa batean uzteko. Mangerak ikusi ditudanean galdetu diot ea dutxatu behar dudan. Ezetz, nahikoa dudala emango didan buzo zuria janztearekin. Jantzi dut eta auziko kide gehienak zeuden gela amerikarrera gidatu nau. Hango algarak, besarkadak et animoak. "Aupa, hi; hemen gaituk berriro". Oraingoan luzerako. (...)*

*Bai, hemen gaude. Lehenengo aldiz txaboloko atea itxi didatenean —mantso-mantso, zirkuitu zentraletik kontrolatuta—, hilobiko tapa ixten ari direla iruditu zait. Asteburua baino ez dugu egin berton. Apenas atera gara txabolotik, argazkiak, fitxak betetzera edo medikua ikustera izan ezik. Familia ikusteko orduan atera gaituzte haien muturren aurrean, eta Valdemoron sartu naute beste zortzi kiderekin. (...) Hilabete osoa egin dut Valdemoron. Nire kideak beteranoak dira eta badute kartzela*

*barruko berri, niretzat lehen aldia da eta erabat despistaturik egon naiz, ohitu bitartean. Gizakien aparkalekua iruditu zait espetxea: iluna, berde-iluna, sotoa, zuina, zuloa. Ez naiz ordea gaizki sentitu gizarterako gaizkile den jendearen artean. (...)*

*Biko ziegatan jarri gaituzte, ni Patasekin, eta gero Txema Matanzasekin ia hiru aste. Txemarekin ikasi ditut kartzela-sistemako lehen gorabeherak. Lagun bikaina eta aditua suertatu zait gelakide, zorionez. Hementxe bete ditut nire lehen hirurogei urteak, eta ez naiz koadrilako zaharrena. Hamaiketakoa egin dugu elkarrekin galerian, eta La Catedral del mar (Ildefonso Falcón) oparitu didate, denbora-pasa probetxugarria izateko. Hiruzpalau egunetan irentsi dut. Pixka bat deprimituta sartu naiz, baina hemen ez dut nabaritu; izan ere hara eta hona ibili gara: txabolotik patiora, patiotik Audiencia Nacionalera. Lotuta joatea zer den badakit. Dutxatzeko patiora jaitsi beharra eta ur beroak hamar minutu eskas irauten duela txorrotean. Berandu iritsiz gero gosaririk gabe geratzen zarela. Epaitegitik bueltatu eta jan gabe oheratzea ere tokatu zaigu noizbait. Kideen protestak nolakoak izaten diren jabetzen hasita nago: enkarteladak, txapeoak, funtzionarioekin liskarrak. (...)*

*Urte berrian sartu orduko sakabanatu gaituzte: Espainiako punta batetik bestera, gora eta behera, ezker, eskuin. Goizean goiz atera gaituzte Patxo, Isidro eta ni-neu. Nora ote goaz? Auskalo. Furgoi berberean atera gaituzte. Murga anaiek Burgosera jarraitu dute. Nire destinoa Dueñas izan da: bizitzaren ironia, ni bakarrik Mariren lurraldean, eta bera bakarrik* **nirean**. *Mari, ai Mari, zer gertatuko ote da gurekin? (...)*

*Dueñaesen bakarrik nago behingoz. Zigortzeko ipinitako neurria, gure intimitatea gordetzeko era onena bilakatu da. (...) Txaboloa ez dago gaizki. Dutxa barruan daukat eta ez naiz larri ibiliko dutxa beroa harrapatzeko korrika, eskaileretan behera. Nire aurretik bizi izan den*

*berebereak txukun utzi du dena, eta telebista oparitu dit. Ez fidatzeko esan didate kideek. Oparia ez dela doan izango. Haren mesedetik esekita geratzea zen prezioa: orain tabakoa, gero Coca Cola, gero kafea edo garbikariren bat."Ez, tori, zuretzat; erosiko dut berria". Eta itzuli egin diot: ez dut beste menpekotasunik onartuko. Aski badut. "Lagundu bai baina distantziak gordez", gomendatu didate Igor eta Oskarrek. Tabakoa errazegi ematen hasi naiz, baina hori ere laster kontrolatu behar izan dut. Arrazoia sinplea da, denek azkar ulertu dutena: nik ez dut erretzen, beraz tabakorik ez dut emango. Miseria gorrian dagoen jendearekin nago. Laguntzeko era eraginkorragoak bilatu beharko ditut. (...) Oso preso arriskutsua omen naiz, FIES; beraz, nire korrespondentzia interbenituta daukat nire gaitasun kriminalagatik, erakunde terroristako kide omen naizelako eta zentroko segurtasuna arriskuan jar nezakeelako. Hainbesterako ote naiz! (...)*

## -II-

Kantabrian pausaldi txikia eginda —osaba apaizaren ondoan— iritsi zen mutiko politta Bizkaiko lurretara. Balmaseda hezea zen, euritsua, jaioterria bezalakoa alde horretatik begiratuta. Apaiza izan nahi zuen. fraide korazonista —Gipuzkoako toki batzuetan korazonista esaten zioten fraide klaretarrei, Mariaren Bihotzeko seme misiolariei—. Bi osaba zituen elkarte hartan, bai, egia da, baina ez batak, ez besteak ez zioten sekula esan ikastetxeko fraideak utzi eta eurengana joateko. Hala uste du orain ere mutiko polittak; edo ez da gogoratzen beharbada gertakari haren —fraide egin nahi izanaren— jatorria non eta nola kokatu behar den, zehatz-mehatz. Esan bezala, hiru fraide-klase izan zituen gidari hirigunera bizitzera etorri zenetik: ikastetxekoak (eskolapioak), eliz parrokikoak (klaretarrak) eta etxe ondokoak (frantziskotarrak).

Bakoitzak bere erara zertxobait eragingo zioten arren, ez du uste inork modu nabarmenean erakarri zuenik besteen gainetik; isileko eragina izango zen, inondik ere. Erabakia propioa izan zelakoan dago, hark etxetik, hots, guraso eta anaia-arrebengandik, urruntzea zekarkion arren. Familia erlijiosoa zuen, garaiko gehientsuenen erara, baina ez zuten zuzenean bultzatu urrats hura ematera. Onartu, onartu zuten, atzera eginarazteko ahaleginik ez zuten egin bederen. Urteekin jakin du arrebek esanda ama atsekabetuak esan ohi zuela: “Seme bat gutxiago”. Gaurko talaiatik begiratuta nekez uler daiteke mutiko bat hain gazterik etxetik atera izana, baina halakoxeak ziren garaiak eta mutiko polittaren kasuan halaxe gertatu zen.

Hamar urte baino ez zituen, eta hantxe bukatu zitzaion haurtzaroa, 1956eko irailean. Behin seminarioan sartuta ez zen etxera itzultzeko

ohiturarik; urtean hilabete bat baino ez, udan. Haragizko familia utzi beharra zegoen, beste batean txertatzeko, idealez, ilusioz, etorkizunez, gurariz, promesaz eta errebelazio goitiarraz onduta, aukeratuen sailera deitua izanez gero.

Mutiko polittak ama eta arrebak zeuzkan etxean; seminarioan, aldiz, ez zegoen neskarik, ez emakumezkorik, sukaldari xaharra izan ezik. Mundu femeninoa arrotza zen guztiz gotorleku hartan, erreferente bakarra Amabirjina izaki, aldi berean ama, emakumea, amorantea bat-batean eredu eta jarraibide bihurtua. Esan daiteke trauma kontzienterik gabe bizi izan zuela mutiko polittak garai hura: bizi-bizia zen, azkarra, ikasketetarako erraza, malgua, gaiztakeriarik gabea, ernea eta inozoa. Gainera *osabaren iloba* zen, eta horrek halako ospe adierazkorra ematen zion.

Seminarioko hizkuntza gaztelania zen, mutiko polittak orduko ederki menderatzen zuena herrietako maistrei eta eskolapioei esker. Euskara ez zen existitzen, inork ez zuen aipatzen, beraz trastetegian gordetzeko zera zen garai hartan, inolako baliorik gabekoa. Eta halaxe zenez, hartara egokitu ziren bai mutikoa, bai bestelako kideak. Euskal jatorriko kide bat baino gehiago bizi zen oilategi hartan, eta euskaraz mintzo zirenak ez gutxi. Itxuraz zalaparta handirik gabe bizi izan zuten deserrotze hura. Euskara ez zegoen debekatuta esplizituki; ezertarako ez zen erabiltzen, hura zen dena. Beraz, espanturik gabe moldatu ziren haur euskaldunak gehiengoaren hizkuntzara, gaztelaniara alegia. Inoiz edo behin txutxu-mutxuka eta ilunpean erabiltzen zuten batzuek ama-hizkuntza euren artean; mutiko polittak ere bai. Argiak itzalita eta apaiz arduradunaren oin-urratsak aldentzen zirenean ausarten ziren batzuetan, gutxitan, ohetik ohera, zerbait gaitzesgarria egiten ote zuten zalantzan, edozein moduz.

Hala bizi zuten gehienek egoera tamalgarri hura. Baina ez denek. Bazen bat —hura ere mutiko politta, horaila eta begi urdinduna— Arratiatik Enkarterrira ekarria, apaiz izateko presta zedin. Ez zuen, ordea, gaztelania menderatzen, eta gorriak pasatzen zituen moldatzeko. Patiora jaitsi eta, jolastu ordez, bazterrean etzanda egoten zen sarri, triste eta malkotan. Jolastera laguntzen zioten arren, etsita geratzen zen bere bakardadean, luze baino lehen etxerako itzulbidea hartu zuen arte. Mutiko polittaren imaginario urratuan betiko itsatsita geratu zen euskalduntxo hura (abizenez Goiriena), ezinean, abailduta, hasi ahala atzera egin behar izan zuena bere apaizbidean euskararik existitzen ez zelako.

Seminario txiki hura etxe zahar, iluna zen, alde batetik auzo-etxe bati itsatsia, eta bestetik fraideen eliza publikoari. Bi solairuz osatua, ganbera handi batzuk besterik ez zituen goikoan, alderik alde, apaizgaientzat —lo egiteko, ikasi eta otoitza egiteko, inolako bizitza pribaturik gabeak—; eta behekoan apaiz eta legoen banakako gelak. Bi solairuen arteko banaketa ia erabatekoa zen, bi mundu, bi bizimodu, nahiz eta harremana estua zen ezinbestean, ez alferrik, batzuk hezitzaileak baitziren eta besteak hezigaiak. Edozein moduz, beheko solairura jaitsi, apaizen esparruan sartu, korridoreari itzulia eman eta inork harrapatua izan gabe—apaiz edo legoren batek gelako krisketa ireki gabe, hain justu— gora onik iristea izan ohi zen abenturarik zailena eta, beraz, gutiziatuena. Apaiz haietako batek betetzen zuen gurasoen tokia —aita, ama, babesle, begirale, aholkulari eta epaile—, ondoan beste bat zuela —laguntzaile, hornitzaile, ordezkari eta konplize—.

Autarkian bizi zen seminarioa, ordenaren sosei esker, izan ere apaizgaiek hilean ordaintzen zituen bost pezeta haiekin, eta hori ahal zuenak —alokairu bainoago seinale modura—, ez baitzegoen egoitza, ikasketa, garbiketa eta janaria ordaintzerik. Ikasi gogotik ikasten zen

seminarioan, eta otoitz egin, zer esanik ez, beneditarrren *ora et labora* jomugan. Izan ere, ikasgela zen seminarioko zentroa —gela luzea, binakako pupitreak lau ilaratan—. Han prestatzen ziren ikasgaiak, egiten ziren etxeko lanak. Hantxe ematen zituzten arduradunek beren hitzaldiak, *konferentziak*, tropa heztera eta apaizgaiak ilustratzera bideratuak; bezatzera, elegia. Ordu luzeak egiten ziren ikasgela hartan goizez, arratsaldez eta ilunabarrez, errezoekin tartekatuta. Ordu haietan leihoetatik ikus zitekeen zeru goibelari begira egon ohi zen mutiko politta, behelaino eta ziri-miri etengabean lausoturiko zeru-puskari. Egun argiagoetan Kolitza gaina nabarmentzen zen urrunean alde batetik, eta bestetik Trasmosomos eta Espaldaseca are urrunagoak, Garbea zaharraren mendilerro berberean. Beheko aldean, seminarioko sotoetatik gertu, Kadagoa ibaia zebilen erromatarren garaiko zubi ospetsuaren azpian doi. Mutiko haiek, herriaren zerbitzari izan nahi zuten gaxte haiek, ez zuten inolako harremanik bertako adinkideekin, ez nagusiagoekin ere. Asko jota futbol-partidaren bat Baluga zelaian Maristen ikastetxeko gazteen aurka. Hango algara eta harrabotsa jolas-egun haietan, inoiz futboleko uniforme berriak estreinatzen zirelarik!

Amantala grisa jantzita ibiltzen ziren apaizgai gaztetxoak, azpiko arropa xumeak ez zikintzeko eta, aldi berean, uniformatuta joateko, seguru aski. Oinetan zapatak, eta kirola egiteko apretak (garai hartan erabat arrotzak ziren *Nike*, *Mizuno*, *Adidas* eta bestelakoak). Batere kolorerik ez haur haien janzkeran, tropa-itxura ematen ziena. Egun osoan taldean ibiltzen ziren —eskaileratan gora eta behera, eskolan, ikasgelan, jantokian zein errezoetan—, eta kalera irteteko ilaran, hirunaka, kate hits errukiorra osatuz kanpotarrentzat; eurentzako, ordea, gauzarik arruntena zen, seminarioko legea, alegia, inork urratu ez ezik zalantzan jarri ere egiten ez zuena. Izan ere, baimenik gabe inork ez zezakeen lege hura hausterik.

Hartara bada, pozik asko ibiltzen ziren mutikoak, dela Zallako bidean —*Vuelta España* pasatzen zenean, jai egiten zuten seminarioan txirrindulariak ikusteko: Loroño, Gabika, Van Stenbergen, Koblet, Barrutia—, Artzeniegarantz —igandea izanez gero minututxo batean pausatuaz futbol-partida ofiziala doan ikusteko—, Pandozales edo Ordunte inguruko bideak zapaltzen zituzten, nola edo hala toki apartatuak, herrigunetik bazter, *munduarekin* ez kutsatzeko ahalegin behartuan. Era hartara ez zegoen bestelako lagunik egiterik, noski. Beharrik ere ez, zertarako, aski baziren etxepe bereko larrean zeuden berrogei bat apaizkumeak, giro epel eta sainduan aterpeturik, ahalik eta edozein eragin kaltegarritik libre.

Garai hartan bazen belaunaldiz belaunaldi bolo-bolo zetorren pasadizo harrigarria, seminarista berriei zaharragoek azaltzen zietena; alegia, Kolitza barreneko pinudietan ezkutaturik ibili zirela bi bandido ezagun, Juanin eta Bedoya izenekoak, Santander aldekoak biak. Makiak izango ziren, noski, baina hitz hori ez zen erabiltzen ahoz ahoko kontakizun inozo haietan. Joanin eztiagoa omen zen, Bedoya, berriz, zakarragoa. Hala ere bandidu zintzoak ziren, itxura denez, aberatsei lapurtu eta hobariak pobreei banatzen zizkietenak. Paraje haietan bazen, adibidez, txalet ospetsu bat, ordurako aski eroria, mendi-magal haietan ezkutaturik, Balmasedako *millonarioarena* izan eta bi maki haiek erre zutena. Otxarango maldan gora, Urreztietara bidean, miresmenezko soa egiten zioten apaizgai inozo haiek, batik bat frontoi zabalari, solasa apalduz badaezpada ere. Ordurako hilak ziren bi bandidu haiek, guardia zibilen segada batean jausiak. Edozein moduz txapelokerrak ziren gaiztoak, bandidoak zintzoak...

Bazegoen, hala ere, orduko balioen arabera, herritarrekin batera parte hartzea zilegi begitantzen zen data berezia: Aste Santua. Ospetsuenetan ospetsua zen Balmasedako Aste Santua; orduan agian ez

hainbeste, baina gerora jendoldea erakartzen duena. Goiz-goizetik paratzen ziren mutikoak seminarioko leiho estuetan kabitu ezinik, soldadu erromatarrak, judu gaizto salduak, Jesus arantzaz koroatua, Amabirjina beltzez jantzia eta enparauak leihoen aurrean noiz azaldu zain. Etorri bitartean seminario atzeko moja klaratarren atarian bildutako jendearen oihuak entzuten egon ohi ziren haurrak, bertara joatea debekaturik zeukatelarik, Jesus Anas eta Kaifasen aurrean, Pilatosen borreroen mende eta zigorpean oinazeztaturik papera beteko zuen herritar gaztea, egun haietan aktore bihurturikoa, irudikatuz. Ez zen, ordea, Jesus umemoko haien pertsonaiarik ospetsuena: orduko izarra Zireneoa zen, Jesusi laguntzera beharturiko gizon arlote prestua. fraideek zeukaten soroan artajorran ari zela harrapatu ohi zuten soldaduek sasi Zireneoa, eta mutiko liluratuen begien aurrean gertatzen zen pasartea: ”begira, begira”. Pasarela moduko zerbait zen hura dena gaxteentzat: Jesusen jantzi zuri urratua, Amabirjinaren kapa beltz distiratsua, Veronikaren soineko morea eta oihal zuria, herritar juduen soingaineko luze koloretsuak, erromatarren peto metalezkoak, kasko gandordunak, sandalia lokarridunak, etab. Besterik ezean, harekin osatzen zituzten aste osoko txutxu-mutxu, eztabaida eta kontakizunak: nolakoa izan zen Jesusen hirugarren erorikoa, aktoreak minik izango ote zuen soldaduen zigorkadekin, juduen oihuak gehiegizkoak ote ziren, bidera ateratzen zitzaizkion emakumezkoak zein samurrak ziren, etab.

Gogotik ikasi beharra zegoen seminario txikian —latina, matematika, literatura, gaztelania, natur zientziak, denetarik—, apaiz arduradun ordezkoaren begirada zorrozpean beti. Ikastorduetan ez zegoen hitz egiterik. Isiltasuna zen lege, berdin jantokian eta, oro har, jolas-orduetan izan ezik. Eta argi ibili, izan ere begiralearen ohar-pare bat gainditzuz gero, *trementina* izeneko egurrezko erregela guriaren laztan erregarria itoaraziko baitzituen berriketa-gogoak oro. Ikastal-

di-bukaeran ziztu bizian ateratzen ziren kolpatuak, ur-txorrotaren azpian esku-ahur gorritua goxatzera, hurrengoan erneago ibiliko zela zin eginez. Beharko!

Gela handian ikasitakoa beheko solairuko gelatxo ziztrin batean hustu behar izaten zen irakaslearen aurrean —banku luzean hormaren kontra eserita—, batek ez zekiena hurrengoak adieraziz, batek besteari lehia egin eta gehien zekienak —huts gutxiago egiten zituenak, alegia— zerrendako lehen lekua irabaziz, eta alderantziz. Han ere isilik, jakina, bestela ilararen atzeko aldean bukatzeko arriskua zegoen, irabazitako postuak oro galdu, eta berriro, kostata, atzetik aurrerako lasterketa abiatuz, lehia eroan edo patxadan, bakoitzaren izaeraren arabera. Mutiko politta aurreko lekuetan egon ohi zen gehienetan, memoria onari esker, aurren-aurrena ere bai inoiz. Ilararen atzeko muturra ezaguna zuen, nork ez, urduritasunak eragindako berriketaldi edo bihurrikeriaren bati esker. Serio-demonio hartzen ziren han gauzak: hamar-hamahiru urteko mutiko gorriak izan arren, “Señor A” eta “Señor B” ziren, zuka adeitsuz izendatuak. Esan daiteke mutiko politták batere arazorik gabe gainditu zituela ikasketak eta ikasturteak. Bere portaera ere ez omen zen txarra, eta beraz, ondo kontsideratua izan zen beti, bide onean ondo moldatzen zelakoan.

Irakasgaietatik aparte ezer gutxi irakur zitekeen seminario txikian, Aita Galdeano jesuita nafarraren abenturak izan ezik, hots, Alaskako izotz-lautadatan hartz txuri, itsas-lehoi eta enparauei itzuri eginez inuit basatiak kristautzeko ahaleginean bizi izandakoak jasotzen zituen komiki miresgarriak —telebistarik eta irratirik ez zegoenez, gidoi eta pelikula propioak harilkatzen zituzten beren baitan gaxte haiek misiolari nafarraren kontura—; edo literaturako irakasleak Iraultza Frantsesari buruzko liburu zahar bat, orri horiztatutakoa,

eskolan bertan zatika irakurtzen ziena. Maria Antonieta, Kapeto, Robespierre, Danton eta batik bat *sans coulotte*ak izan ziren mutiko polittaren heroiak aldi batean, etxetik ekarritako *Capitan Trueno, Sigrid, Roberto Alcázar y Pedrín* eta beste batzuk bazterrean utziz. Ez ditu inoiz ahaztu Kapetoren burua gillotinaz moztean paristar zarpail haiek egindako irrintzi eta aldarriak, orduan apenas ezer ulertzen ez zuen arren.

## Familia berrira egokitzen

Mutiko haiek seminarioan bertan bizi ziren apaiz sotanadunak bezalakoak izan nahi zuten. Hura zuten helburu, beraz, gizon haiek ziren euren eredu ia bakar; haiek, eta noizean behin buru-bihotzak berotzeko misio-lurraldeetatik iristen zirenak. Apaiz edo legoen bizimodua berdintsua zen, aldeak alde. Aparte bizi ziren, baina ordutegi antzekoa zuten denek, seminarioaren funtsa mutiko haien bokazioa landu eta ordenako jarraipena ziurtatzea izanik, haiek kide oso bihurtuz. Mutiko haiek gaxteak ziren arren antzematen zituzten ezberdinatasun batzuk, eta ez zituzten oso gustuko, batik bat janariei zegozkienak. Seminaristen bi arduradun zirenak izan ezik gainerako apaiz eta legoek jantoki propioa zuten, euren artean mintzatu ahal izateko mutikoen begiradetatik urrun.

Hala ere berehala ohartzen ziren harako jakien joan-etorri usaintsu eta segur aski zaporetsuez, batik bat jai seinalatuetan, dela fundatzailearen urteurrenean, Amabirjinaren egunean eta Aita Nagusiaren urtebetetzean. Halakoetan apaizak zerbitzatzera joan ohi ziren mutiko aukeratu batzuk, jakiak eta edariak sukaldetik jantokira garraiatzera eta, zori pixka batekin, bazkalostean haien aurrean abestera edo an-

tzeko ikuskizunen bat aurkeztera, adibidez soinuren bat jotzen norbaitek zuen trebezia erakustera. Handik beti ateratzen zuten goxokiren bat edo beste, edo tragoxka, eta nolanahi ere den, bazuten zertaz mintzatu tropako beste mutikoekin. Gainontzean, berdintsu dastatu behar zuten batzuek eta bestetzuek amerikanoen gazta borobila eta esne-hautsa. Behin baino gehiagotan gogoratzen zuen mutiko polittak, seminario hartan doi gaixotu zela osaba, zer janik ez zutenean.

Fraide haiek bazuten apaizgaiek ez zeukaten toki ezkutu bat, pribatua alegia, euren artean bildu eta solastatzeko zerabiltena, seminarioko patioa gurutzatu eta maldan gora joanda iristen zen toki gordea. Mutiko polittak inoiz konprobatzerik izan zuenez —hainbat urte geroago—, uraska estu bat baino ez zegoen han, zeinaren inguruan harrizko eserleku luzanga batzuk zeuden, eta alboetan loreak, batik bat daliak, eta marrubi-sail batzuk. Beste munduko ezer ez zen, beraz, baina, hala ere, atezuan egon ohi ziren mutikoak, fraideak ilara informalean edo banaka, euren begietatik parean aldendu eta aldapan gora galtzen antzeman orduko. Guztiz ere gazte samarrak ziren fraide haiek denak, eta aita nagusia nolakoa zuten, modu desinhibituagoan jokatuko zuten, euren algarak eta hotsak salatari. Estimatzen zuten, ordea, gaxte deserrotu haiek fraideekin batera jostatzea, adibidez esku-pilotan, edo euren artean erronkan palaz jarduten ikustea, sotanak jasota edo kenduta, bikote baten edo besteren alde apustu eginez.

Ikasketaz, otoitzaldiz eta jolasaz gain egiteko ezer gutxi zeukaten gaxte gorri haiek urte osoan. Arduradunek zeregin batzuk banatzen zituzten, eurak iristen ez ziren tokietara eta unetan iritsi ahal izateko. Hartara boterearen begi eta marka bihurtzen ziren karguz beztituak. Gutiziatuena, eta aldi berean larriena, ikasgela handiko ardura zen, azkeneko pupitrean betetzen zena: kideak estudiatzen ote zuten,

aldamenekoarekin berriketan ote zebiltzan barrezka edo denbora alferrik galtzen jarduten ote zuten, etab. bijilatzea. Haren kontaduriak erabaki ohi zuen, neurri handi batean, tropako kide bakoitzaren egoera: askaria emango zioten edo ez, jolas-orduan pilotan edo futbolean aritzerik izango zuen zein ez, edo zer bestelako penitentziaren zama eramango zuen gaiztakeria ezabatzeko, inpunitaterik ez baitzegoen batere. Dena ez zuten harrapatzen, noski, eta inoiz edo behin aurreko mahaian esertzen zen apaiz begiraleak ere ez.

Aipatutako ardura hura nagusien konfiantzaren froga zen, eta jakina, estimatuetan estimatuena bihurtzen zuen hartarako aukeratua. Mutiko polittak ez zuen inoiz kargu hura erdietsi. Bigarren urtean, ordea, kaperaren ardura eman zioten, esne kondentsatuaren jabearekin konpartituta. Xumea zen zeregina —kapera garbi mantendu, argiak eta kandelak piztu eta itzali, meza emateko tresneria eta jantziak prest eduki, egutegi liturgikoaren aroan arokoa, mahai gaineko loreak zaindu, jaunartzeko obleak eta ardoa hornitu, intsentsua ez zedila agortu, etab.—; eta oroz gain, ez zuen inoren bizimodua baldintzatzen. Kargu edo ardura haren harira ezagutu zuen fraiderik bitxiena, Aita Sanmartin zeritzana. Halako batean norbaitek erabaki zuen apaizgaien kapera bota eta beste modernoago bat eraiki behar zela, eta fraide hura jarri zuten obra buru, zeregin hartarako ezagutza eta trebetasun nahikorik bazuelako; kaperako bi arduraduntxoak izango ziren maixuaren laguntzaile.

Goiz ekiten zion lanari fraideak. Gainerako kideak ohetik altxatu aitzin sartzen zen seminaristen logela luzean. Mutiko politta erne egoten zen, baina fraidea hurbildu arte ez zen ohantzetik mugitzen. Manteo beltz zabalean bilduta igotzen zen fraidea, batere zaratarik egin gabe. Haren betaurreko kristal borobilen distirak salatzen zuen gela ilunean, eta are adats luze kiribilduak. Mutiko bien oinak emeki

astindu eta kaperara jotzen zuten bizkor asko. Pare bat astetan hormak suntsitzen, hondakinak batu eta saskiratzen, zorua garbitzen jardun zuten bi mutikoak fraide igeltseroaren gidaritzapean. Ondoren, kapera berriko absidea eraiki eta margotzen. Atsedenaldietan fraidearen mintzo eztia, kontakizunak eta haren bizitzako pasarteak entzutea zuten gustuko. Garai hartan inoiz ez bezalako adats luzeak zituen, bizkarreraino eroriak, zertarako eta Errusia komunista konbertitu arte halaxe utziko zituen promesa eginik Amabirjinari. Oso pobre, are zarpail, itxura zuen arren, gai zen mutikoen bihotzetara iristeko, haren etorria, hitz-parrasta, bisajearen eta esku hezurtsu urdurien adierazkortasuna apartak baitziren. Txundituta entzuten zioten mutikoek, soa haren ezpain ubelduei josita. Behin batean Gaztelako herrixka batera iritsi omen zen, misioetara. Orduko ohiturari jarraikiz, erretorearen etxean hartu zuen ostatu. Afalorduan zer jan nahi zuen galdetu omen zion erretoreak, eta fraideak "edozer gauza, baita garia ere, izatekotan", ihardetsi. Sukaldera joan eta gari-platerkada ekarri zion erretoreak, erronka modura. Baita jan ere Aita Sanmartinek, txintik atera gabe, gordinik. Balentria haren emaitza zen orduz geroztik jasan ohi zituen urdaileko gaitz, oinaze eta odoljarioak.

Handik urte batzuetara Amabirjina Sortzez Garbiari monumentu bat altxatu behar zitzaiola otu zitzaion fraideari. Txantxetan ez zebilelarik, toki ikusgarri bat topatu eta lanari lotu zitzaion suhartsu, Castro Urdialesen. Tontorrean hasi zen, lurra berdindu eta prestatzen, planoak eskuetan berak marrazturik, bakar-bakarrik, inori baimenik eskatu gabe. Berehala konturatu zen, ordea, materiala behar zuela, eta laguntzaileren bat zama goraino garraiatzeko. Topatu zuen nonbaitean astotxo bat, eta muinoaren bizkarreko atzeko aldean zegoen baserri batean morroi gazte bat, obra bukatutakoan ordainduko ziolakoan. Materiala —area eta zementua, alegia— zegoen tokitik

hartuko zuen, kalearteko biltegi batetik hain juxtu. Egunsentiarekin muinorako bidea hartzen zuen bitartean, biltegira bidali zuen morroia, esanaz, bertara sartu, zementu-zakuak asto gainean kargatu eta etortzeko, albait arinen. Norbaitek galdetuz gero zer zela-eta hartzen zituen zakuak inori eskatu gabe, Amabirjinak behar zituela erantzuteko, eta edozein moduz Aita Sanmartinekin konpontzeko. Halaxe egin zuen gazteak biltegiko arduradun eta beharginak ahoa bete hortz utzirik fraide bele beltzaren ateraldi lotsagarriarekin.

Anartean garrantzi handiegia zeukan Eliza Katolikoak gizartean, eta birao batzuk edo beste tarteko, inork ez zion morroiari zakuak mendi gainera ordaindu gabe eramatea eragotzi. Lanaren atsedenaldian, ogi-pusketa eta txorizo-muturra jaten, fraideak esan ohi zuen jai zeukala biltegiko jabeak, zaku batzuk gorabehera ez zitzaiola deus gertatuko, premiazkoak zituela Amabirjina Sortzez Garbiak, eta ordaintzekotan zeruan ordainduko zizkiotela, erruz. *Frai pitillo* esan ohi zioten herrian. Izan ere, han goian, muino gainean, monumentua altxatzeko hartu zuen mutil gazteari zigarro bana eman ohi baitzion egunean soldata bakar, gainerakoa zerurako utziz. Nola edo hala, kontua da, egin egin zuela monumentua: kapera karratu bat, gainean zutabe luzea duelarik Amabirjinaren harrizko irudiaz koroatua. Berrogeita hamar urte pasatu dira honezkero, eta han jarraitzen du monumentuak, muino gainean, kostaldeko edozein lekutatik ikusgarri, gau eta egun, fraide haren apetaz, "gora begiak altxatzen dituen edonork Amabirjinarekin topo egin dezan". Harako bidea ere irekita utzi zuen fraideak, dinamita-kartutxoak eskuratu, eta leherketaz leherketa harritza zapartatuz, mailadi xumea ebakita, jendea pelegrinazioz edo erromeriaz joan ahal izateko. Sekulako iskanbilak izan omen zituen alkatearekin, baina fraide harentzat Amabirjina eta Errusiaren konbertsioa ziren legea, ez alkate gizajoaren ikuspegia edo ordenantzak.

Neka-neka eginda, hautseztatuta eta pozik oheratzen ziren bi mutiko haiek fraide bitxi haren izaeraz eta ausardiaz, trebeziaz eta hitz egiteko gaitasunaz, hitzari eusteko irmotasunaz liluratuta, haren mailara iristerik ba ote zegoen galdezka. Elizako pulpituan erakusten zuen maisutasuna, dramatismoz betea, mintzatzeko erraztasuna, indarra eta joera apokaliptikoak ez zeukaten parekorik, adibidez. Laster ohartuko ziren, ostera, fraide hark zerikusi gutxi zeukala beste fraide ezagunekin, eta agian haren eredua ez zela oso imitagarria; ale bakana zela, hain zuzen, eromen-punttu erromantikoz ukitua.

fraide izateko jatorrizko familiarekin haustea zekarrelarik, seminario txikian egin ohi zen bizitza *bokazioari* jarraitzearen truke ordenean beste familia emankorragoa aurkituz. Ahalak zituenak bazuen aukera seme apaizgaia seminarioan bisitatzeko, eta noizean behin *paketeak* bidaltzeko. Paketeak, ordea, arduradunek ireki, arakatu eta edukia banatzen zuten, *norberaren ondasunak konpartitzekoak* zirelako. Behartutako konpartitze hark arazoak sortzen zituen sarri. Mutiko polittaren senideak urtean behin joaten ziren seminariora: taxia hartu eta gurasoak eta arrebaren bat edo beste, txandaka, egun pasa, auskalo zein buruhauste ekonomiko konponduta. Egun zoragarria izan ohi zen *bisita-eguna*, seminariotik kanpo herriko ostaturen batean bazkaltzeko parada ematen baitzuen; hala ere ez bakarrik, beste seminarista batekin jaitsi behar izaten zen gurasoengana harrera-gelara, nagusiek aukeratuta badaezpada, haurraren bokazioa babesteko-edo omen. Jainkoari umea oparitu zioten gurasoak ez ziren fidagarriak nonbait.

Bisita-egun batean amak ez zuen etortzerik izan, soilik aita iritsi zen. “Zer esango diot amari, seme?”, galdetu zion aitak itzulerakoan. “Ondo nagoela, ez kezkatzeko, ez duela zertan etorri”, erantzun

zion mutiko polittak. Barru-barruan gorde zuen aitak semearen zakarkeria krudela, handik urte-mordora aitortu zionez. Familia galdu mundu guztia familiatzat irabazteko, erraz eta azkar asko ikasi zuen mutiko polittak fraideen araua.

Ez zen, ordea, dena lilura eta gozamena izan. Gau bat baino gehiago iratzarrita eman zuen mutiko polittak, infernuko sua usainduz, bertara zuzenean joateko ikaraz, bekatu ikaragarriren bat egin ote zuen peskizan izerditurik. Pentsamendu lizunen bat izango zen, haiek burutik pasatzean utzitako arrasto likitsak kutsatuta seguru asko. Garai hartako morala sexu-kontuetan hasi eta amaitzen zen, huraxe zen agidanez infernurako igarobide bakarra, eta pentsamenduak deitu gabe buruan pausatzen direlarik, nekeza zen oso haiek saihestea, eta beraz, "pentsamenduak edukitzea" eta "haiek onartzea edo haietan aztarrika ibiltzea" bereiztea zaila izanik, hango komeriak eta katramilak infernuko atarian bertan, seminario txikiko gau ilunean. Sexua zer zen ez zekien mutiko polittak, bazenik ere ez ziurrenik, alabaina behin baino gehiagotan ohartua zen herriko neskatila hile hori hura eta haren txirikorda luzeak gogoratzea atsegingarria zela. Beraz burura ekartzen saihestea ezinezkoa zenez, burutik kentzea eta irudi pozgarri hartan ez laketzean ez entretenitzean jarri behar zen arreta. Nekez, ordea, atera kontuak. Oharkabean iristen zelarik neskatila hari buruzko pentsamendua —irudi ederra, alegia— zaila zen jakitea aitortu beharko gaia zen edo ez. Behin baino gehiagotan hustu zuen barruko zakua aitorlekuan —″pentsamendu txarrak izan ditut"—, txarretik zer zeukaten ulertu ezinik. Beste batzuetan "hor konpon" esan eta aitortu gabe uzten zuen; lasai ez, ordea, erremina gauean esnatzen zuen-eta.

## *Kartzela-txokoan, beti erne (2)*

*Hemen nagoenez, zerbait idazteko gogoa sartu zait. "Patioan habilela pasatzen den tximeleta hori harrapazak, eta koaderno txiki batean idatzi; gero hik heuk ikusiko duk nola erabili. Baina ez utzi tximeletari hegan egiten, bestela akabo", esan dit Jokin Urainek nire asmoaren berri eman diodanean. Berak horrela atondu omen ditu barruan idatzitako liburuak: ideiei ez joaten utziz. (...)*

*Denboraren joanari buruz dudan pertzepzioak harritu nau lehen-lehenik: mantso doa hemen denbora, eguna bera egoki betetzen dudan arren. Ondo araututa daukat eguna, galtzeko tarterik utzi gabe. Erabat ordenatuta nagoela esango nuke. Antsietate-punttu bat daukat, ordea. Txaboloan sartu arte ez naiz babestuta sentitzen. Neurean sentitzen naiz hemen barruan, nire liburu eta paperen artean. (...) Sinetsita nago hemen eta antzeko tokiren batean bete beharko dudala 60-70 hamarkada kasik osoa. Iñakiri esan diot Auzitegi Gorenak berresten badu gure kondena yoga edo erlajazio-ariketak egiten hasiko naizela: gaztetan otoitz egiten irakasten ziguten, isilik eta kontzentratuta egoten, baina artean ez genuen arreta handirik jartzen jardun hartan. Makina bat saio egin genituen urteetan, emaitza handirik gabe. Irudipena dut orain bizirauteko beharko dudala. Badago beste alde bat, ostera: oraingoan ez dago barru-barruan mintzo omen den Jainkorik; gure baitan gu gaude, gu bakarrik eta Niaren garrasiak, saminak, nahigabeak eta pozaren bat edo beste. Nola da posible ziega baten barruan libre eta babesturik sentitzea? (...)*

*Ordena pixka bat jartzeko nire bizimoduan erabaki dut asteburuan bakarrik idatziko ditudala eskutitzak —dagoeneko oso ugariak—. Egunzati oso bat gordeko dut zeregin horretarako; bestela, ordu batzuk lapurtu beharko dizkiot egun bakoitzari, jarduna etenez. Nahiago dut egun*

*arruntak irakurtzen eta ikasten eman, eta asteburua gutunak idatzi eta bisitak jasotzeko utzi. Horrela gainera astean behin atsedenaldia eta bereizkuntza egiteko —honaino etorri behar atsedenaldia ere beharrezkoa dela ulertzeko!—, errutina hain markatua izan ez dadin, hemen ez baitago astegun zein jaiegun bereziturik, norberak ez badu apropos egiten. (...)*

*Hasi zaizkit bisitak: etxekoak, lagunak, ezagunak. Nire txanda iritsita bat-batean jarri da martxan elkartasuna, era guztietakoa eta beti doanekoa. Hemen barruan asko estimatzen dira gauza hauek —zer esango dute preso arruntek, hainbeste daude hemen hilabeteak eta urteak bisitarik gabe daudenak, eskutitzik gabe, telefono-deirik gabe—: nik astero badut norbait bisitan. Aldiz ni-neu ez naiz inoiz etorri leku hauetara, irakasle-lanetan etortzen nintzenean izan ezik. Norberak sufritu behar du, ulertzeko! (...)*

*Aspaldiko partez, katarrorik edo marrantarik gabe pasa dut udazken-negualdia. Hala ere osasun-arazo bat baino gehiago daukat, botika ugariren menpe nago, gehien gorrotatzen dudan egoeran. Hainbat aldaketa izan ditut bizitzan: bizarra zuritu zait, ilea soildu eta sabela hanpatu urteek aurrera egin duten heinean. Gaixotasun eta botikei dagokienez, sarkoidosia daukat biriketan, belauna banatan mina sentitzen dut, aldaka kili-kolo eta ondorioz min sorra ere bai hainbat unetan hormigoizko patioari itzuliak kentzen nabilenean. Gainera depresio-punttuarekin sartu naiz zulo honetan; beraz, oro har, pilula-mordoxka irentsi behar dut egunero. Atera naute ospitaleko psikiatrarengana: eskuak loturik eduki naute haren aurrean, pikoloak zelatan. Baldintza horretan ezin dudala hitz egin, esan diot neska medikuari. Emateko behar dudan medikamendua eta irakasteko nola kentzen diren horri buelta ematen ari naizela konturatzen naizenean. Horrela eta horrela egin ezazu, gutxituz joan eta utzi. Halaxe egin dut: bat, nire depresioaren aztarna non*

*dagoen badakidalako, eta bigarren ez nagoelako prest psikiatra baten aurrean pikoloz inguratuta hitz egiteko.(...)*

*Bi aldiz erori naiz: bat, txaboloan bertan, eta bigarrena patioan. Lehen aldikoa barruko arropa eskuz garbitu eta zabaltzeko komunaren gainean igo naizenean: oinetakoek irrist egin et laprastean zoru gainean bukatu dut, aldakaz behea joz, komuneko paper-rolloari eusten dion burdinazko euskarria ukitu gabe, zorionez. Bigarren erorikoa patioan gertatu da. Futbol-atearen atzetik pasatzen ari naizela, jokalari batek baloia jaurtitzeko imintzioa egin du, nik aztoratuta atzera jo, estropezu egin eta oreka galduz, hormigoian jo dut buruz. Kasik konortea galduta baina erne, odoletan eraman naute erizaindegira ijito batek eta Landa uruguaitarrak, non lau puntuz josi didaten buru-azala, nik txintik atera gabe: "Qué valiente, para ser hombre...", esan dit doktore andereak. Gero funtzionarioa etorri zait galdezka: "seguro que se ha caído o...; no, he tropezado y me he caído solito; si usted lo dice, se lo creo". Gaitz erdi. (...)*

*Sartu gintuztenean bisitak izateko lagunen kopurua mugagabea zen —datuak eman eta txandaka etorri zitekeen telefonoz abisatuta–, orain hamar bakarrik onartzen dizkigute sei hilean behin; ondorioz, horiek bakarrik txandakatu ahal dira asteburuetako bisitetan. (...) Preso politikook geure artean komunikatzeko baimena eduki dugu orain arte —astean behin, tartean kristala eta telefono bidez, kanpokoekin egiten dugun lez—; hori ere kendu digute, erabat gainera. Hemendik aurrera zailago izango dugu elkar ikustea. (...) Falta zena, bisitariak are zorrotzago arakatu nahi dituzte, bisita aurretik biluziz. Emakumezko askok nahiago dute ez etorri; gure erabakia izan da, biluziz gero ez dugula bisitarik onartuko. (...)*

*UPVtik etorri zait gaztigua: kartzelan sartu ninduteneean bajan nengoen arren, ez didate ordaintzen jarraituko. Garzon jaunak berriro sartu du bere muturra, ordainketarik ez dut jasoko. Garzon instruktore hutsa izan da gure kasuan; beraz kasua berari ez dagokionez, norbait oso azkar ibili da UPVn hari ohartarazten.(...) Sarasibarrek azaldu dit nire kontratua suspendituta dagoela, baina ez nagoela kaleratuta. Kaleratzeko, UPVk despido-gutuna bidali beharko dit espresuki. Ahal du egin, jakina, baina manten nazake ere irakasle gisara. Barruan nagoen bitartean ez dut kobratuko, irten ondoren lanean segi dezaket, nahi izanez gero. Lagun eta adiskideak erresistentzia-kutxa jarri dute martxan berriro, barruan nagoen bitartean diru-laguntza bat eduki ahal izateko. (...)*

## -III-

Hamahiru urte bete gabe eta goitik behera beltzez jantzita iritsi zen mutiko politta berriro Castro Urdialesera. Galtza motxetan, hori bai. Seminario txikiko lehen bi urteak txukun gaindituta eta gauzak serio zihoazela adierazteko, beltzez jantzi beharra zegoen: galtzak, alkandora, jertseak, galtzerdiak, zapatak eta baita gorbata ere, dena. Atseginez hartzen zen janzkera hura seminaristen artean, prestigiozko zera baitzen; ez, ordea, gorbata beltzaren azpian derrigorrez alkandora edo nikia beltza eramateko agindu itsusi hura. Erabat ilogikoa eta zurruna baitzen, baina tira, arauak arau, aurrera egitea zen kontua.

Castro Urdialesen itsasoa zegoen, Kantauri zaharra, eta giroa euritsua zen arren zirimiriaren trazarik ez. Euria euria zen, noski, itsasoko enbatak hauspotua, inolaz ere ez Euskal Herriko euri mehe betiereko hura. Euskal Herria bazenik ere ez zekien, ordea, mutiko polittak; beraz, Espainian zegoenik ere ez apenas.

Itsasoa seminariotik oso gertu zegoen arren, oso gutxitan jaitsi ohi ziren seminaristak hondartzara, eta sekula ez jendea joaten zen orduetan. Joatekotan goizeko zortziak baino lehen abiatzen zen ilara beltza hondartzarantz, azkar eta txintxo, alboetara begiratu gabe. Iritsi orduko hondartza pasealekutik banatzen zuen hormaren kontra eranzten ziren, larrugorritan ez agertzeko toalla gerrian lotuta, eta, orduan bai, zalaparta bizian joan ohi ziren korrika uhinen bila. Gorputz nerabe zurixkak itsaso oldarkorrean murgiltzera. Mutiko polittak ez zekien igeri egiten, bainu-jantzirik ere ez zeukan, beraz, beste norbaitenarekin ibiltzen zen, berea lortu arte, gehienetan olatuek

zapart egiten zuten marra gainditu gabe. Batzuetan, egun bereziki lasaietan, ausartzen zen pittin bat gehiago aurreratzen, bularreraino sartuz adibidez, uhina zetorrenean salto egin eta gorputza uraren mende utziz, bizitzan lehen aldiz kresalaren gazitasuna dastatuz. Inbidiaz begiratzen zien igeri egiten zekiten kideei, bere buruari galdezka non demontre ikasi ote zuten, baina inoiz ez zion inori ikasten laguntzeko eskatu, lotsaren lotsaz igerian berez eta denborarekin ikas zitekeela iritziz, nonbait.

Bigarren seminario txikia etxe karratu ederra zen, bertako dirudun batek, Barquin jaunak, fraide klaretarrei hirurogei eta hamabost urterako utzia. Herriko etorbide nagusian kokatuta zegoen, itsasoari begira, aberaskumeen etxalde ederrez inguratuta. Bi solairuko eraikin zabala zen, eta haren sarreran indiano-kutsua zemaioten bi palmondo dotore zeuden. Adreilu eta zementuzko horma batek bereizten zuen beste etxe eta kaleetatik, eta aurrean hesi barroteduna zeukan, jauntxoen txaleten antzera. Barrutik lehenengo seminario txikia baino askoz argitsuagoa eta airosoagoa zen, beste arau txukunagoan antolatua eta prestatua, eta batik bat futbol-zelai handi eta belarduna zeukan, benetakoa, Balmasedakoa areazkoa baitzen. Euri-egunetarako galeria kristalduna zeukan, alderik alde patio aurrean, eta han ibili ohi ziren gaxteak ping-pongean, kontu-kontari edo, besterik gabe pasieran eta kuxkuxean. Frontoia pulamentuzkoa zen, bi aldeetara irekia, erdiko hormak bereizten zuelarik ezker edo eskuin jolastea. fraideek ere sarri zerabilten frontoia palaz binaka aritzeko.

Ikastetxe hartan bazegoen zerbait oso hurbilekoa, nola edo hala etxean zegoen inpresioa ematen ziona, osaba apaizaren ausentzia-presentzia. Osaba apaiza seminarioko arduradun nagusia izana zen urtetan, eta ospe handiko gizona zen elkartean. Oso idazle trebea eta hizlari aparta zen. Seminaristen gurasoekin komunikatzeko aldizka-

ritxo bat prestatu zuen, non bere irudimenak sortutako Pedromari pertsonaiak apaizgai gazte baten gogoeta, ilusio, zeregin eta gora-beherak azaltzen zizkien. Pedromari ikasgela nagusiko hormetan margotuta zegoen, atzeko partean, garai batean irakurgela izandako txokoan, zeina gerora harekin bat eginda geratu zen, seminaristen kopuruak gora egin zuenean. Mutiko polittarentzat harrotzeko motiboa zen, noski. Osaba apaizak atondu zuen seminaristen himnoa, *Mendizaleak* euskal abestiari jatorrizko hitzak hustu eta, haien ordez, gaztelaniazkoak erantsita. Berak ikusita zeukan osabaren letra txiki-txiki dotorea partituraren tarteetan egokitua, beraz, jai-egunetan seminario osoak himnoa abesten zuenean, zirraraz hunkitzen zitzaion bihotz gaztea, hanpatuta.

Ekitaldi osagarrietan topatu zuen mutiko polittak asaskabidea. Arduradunen trebeziaren araberakoak izan ohi ziren, eta aldi hartan, musikarekin zaletuak egokitu zitzaizkion. Zaleak ez ezik piano-joleak eta kanturako egokiak. *Belada* izeneko ekitaldiak prestatu ohi zituzten aldian behin, egun seinalatuetan, eta han azaldu behar zen ordu luzeko saioetan ikasitakoa. Hango egoiliarren artean baziren batzuk poemagintzan abilak, pianoa jotzen oso trebeak, idazle iaioak, eta saio kolektiboei zegokien arauz abesbatza ondo landua eta *rondalla* —harizko musika-tresnez osaturiko taldea— zaildua. Gutxi-asko denetan zerbait izan nahi zuen mutiko polittak, zenbaitetan arrakastaz. Adibidez ahots zoli bikaina aurkitu zion musika-zuzendariak, eta aurrerantzean bera izaten zen abesbatzan ez ezik kaperan bakarlari.

Urte haietan Erromatik Parisera aldatu zuten osaba legoak esku-soinu txiki bat bidali zion, iloba kuttuna jotzen saia zedin, baina hala-moduzkoa zen mutiko polittaren gaitasuna, eta zaletasuna barru-barrutik ez zetorkionez, zerbait izan-nahiaren apetatik baizik,

ahalegintxo batzuk burutu ondoren berehala alboratu zuen hauspo hura. Belarriz jotzen saiatzen zen beti, solfeoan eta ariketa lehorretan aritu ordez. Isileko lan jarraituaren ordez, nahiago nonbait erakustaldi erraza eta berehalakoa. Hartara, behin baino gehiagotan jo zuen rondallarekin, ilunabarreko beila musiko-literario formalagoetan, eliza nagusiko koruan zein aita arduradunak gimnasiarako prestatutako doinua markatzen, ikastetxeko patioan. Deus apartekorik ez, ordea. Musikarako baino idazketarako hobea zela zirudien, eta hala saiatu zen kide zaharragoen arrastoari jarraitzen. Dena zen gaztelaniaz, *of course*. Belada haietan gorena eta hunkigarriena Amabirjinaren kobazulo ondoan egin ohi zen. Asko arduratu, saiatueta landu beharra zegoen Zeruko Amaren aurrean ganorazko zerbait atontzeko: poematxoak, hitz lauzko testuak zein abestiak. Astetan prestatzen ziren noizbehinkako ekitaldi erlijioso-kultural haiek, mutiko nerabeen bihotz-altxagarri zirenak, aita arduradunen gidaritzapean edo haiek hautatutako seminarista beterano batenean.

*La gruta* esaten zitzaion txoko hari. Futbol-zelaiaren amaieran zegoen, mendiaren kontra, harkaitz naturalez eta huntzez osaturiko koba. Han ez zen Amabirjinarik agertu, noski, Lurdesen bezala, baina gazte-tropa haren babesle, zaindari eta gidaritza-zereginzak betetzen zituen Zeruko Amaren eskaiolazko irudi txiki hark, bere presentziaz amaordetza ziurtatuz bidebatez. Mariaren Bihotzaren Seme izateko prestatzen ari ziren mutikoak, beraz erabateko lehentasuna zeukan harekiko atxikimenduak, maitasuna eragin eta zaintzeak. Mara-mara, elur geldoaren antzera, ontzen zuen mutikoen bihotz-sentiberatasuna Zeruko Amarekiko joerak. Kaperarekin bat, bigarren seminarioko tokirik ospetsuena zen kobazulo hura. Ohikoa zen mutikoen bat edo beste han pausatzea jolastorduko edozein unetan, zutik, bere baitan bilduta, soa Amaren begietan ipinita, otoitzean edo isil-isilik. Arreta zorrotzez zelatatzen zituzten apaiz arduradu-

nek harako joan-etorriak, seminaristen ezpal sendoa, edo hauskorra, kontrolatzeko.

Mutiko politta ez zen inoiz debotoen multzokoa izan, muzinik egiten ez zion arren deboto izateari. Seminarioko bertute estimatuena zen, apaizgaien egiazko tamaina ematen zuen neurgailua, alabaina pittin bat nekagarria zeritzon, eta beraz, ez zen lehengokoen lehena izaten errezo-kontuetan, txostenetan hala ziotenez. Eskolan, ordea, hiruzpalau onenetarikoa zen, matematikatan izan ezik. Egia baldin bada zenbakietarako txarra dena denetarako txarra dela, atera kontuak. Adin hartan hori nabarmena ez zen arren, agian bere izaeraren osagarri bat erakutsiko zuen, problemak aztertu eta ebazteko nagia, katramilak askatzeko uzkurtasuna, alegia.

Hizkuntza, literatura, gizartea, natur zientziak, latina eta greziera erraz ikasten zituen mutiko polittak, eta bikain izan ohi zen bere kalifikazio naturala, matematika, fisika-kimika eta holako aldrebeskeriak kenduta, esan bezala. Aldrebeskeria haiek gainditu ezinik eta galdetzeko ezgai, adiskideren baten laguntzara jo ohi zuen zenbaitetan, haren lana kopiatzera esan nahi baita. Beste gai guztietan hain trebea izanda sekulako frustrazioa zekarkion problemak ebazteko hain baldarra izateak, eta sentsazio hari gaindiezin iritzirik, hobe albo-konponketetara jotzea; oker zegoen, oker zegoenez, jakina, baina orduan ez zekien antzematen zein kaltegarria izan zitekeen jokaera hura. Ez zuten sekula harrapatu, baina ikasi ere ez zuen ikasi, eta hala, hiru urte haiek egin ondoren, betiko baztertu zituen zenbaki-kontuak, eta aldiz, trukean gauzak gaizki eginaren erresumina nozitu zuen, ongi aritzearen itxurakeriatik zetorkion sentsazio abailgarriarekin batera.

Kopiatzen uzten zion mutilarekin klandestinitatearen kilima gazigozoa nabaritu zuen mutiko polittak, urdailean beldurraren zimi-

koa zer zen eta atsegin eztigarriaren fereka antzematen. Hiruzpalau urte zaharragoa zen mutil hura, Abilio, Gaztelako iparralde ikaztutik Kantauriko itsas-bazter hartara ekarria. Mutiko politta baino hagitzez trebeagoa, zeregin praktikoen ardura eman ohi zioten beti seminarioan; pilotak eta baloiak josi, kaleko burdindegi batean trasteak erosi, pelikulak emateko makina zaharra kudeatu, eta halakoak. Oso gutxitan iristen zen zinema seminariora, zehatzak izateko pare bat film ikusi zituzten hiru urtean, *Rapsodia Húngara*, adibidez, Chopinen piano-pieza batek musikatutakoa. Halakoetan aldez aurretik prestatu behar izaten zen makina zahar hura, arku voltaikoz funtzionatzen zuena, eta han ibiltzen zen Abilio, traka-traka, martxan jartzen. Nolanahi ere urte osoan gordetzen zuen giltza, eta abagunea zeukanean bertara joatera gonbidatzen zuen mutiko politta.

Trastetegi hartara ailegaturik, makina zaharraren sekretuak ez ezik hango beste aurkikuntza batzuen berri ematen zion, hala nola, pelikula-latak, arbelezko disko potolo batzuk, *pic-up* batean orratz birakariaz doinu erlatsa zabaltzen zutena, Perry Massonen zenbait eleberri, auskalo nola lortutako zigarrotxoak noizbehinka, *Bisonte* eta *Chester* gorria. Jargoi erretzen zituen Abiliok zigarrotxoak, behin baino gehiagotan aritzearen aritzez, baita mutiko polittari dastarazi ere aldian behin, debekuaren xarma piztuz. Egoki moldatzen ziren trastetegiko joan-etorrietan, arduradunen eta bestelako begiluzeen presentzia saihetsiz eta, nola edo hala, bien arteko ehun ezkutua harilkatzen joan zen, konplizitate goxoa sortuz.

Txikikeria dirudien portaera hura uste baino larriagoa zen, izan ere zerbait susmagarri, eta beraz gaitzesgarri, izatekotan binakako adiskidetasuna baitzen seminarioan. Banaka ibiltzea ez zen gomendagarria, bakardaderako joera ez baitzen ezer positiboren seinale; binaka jardutea, berriz, lizunkeriarekin lotzen zen, horregatik hobesten zen beti gutxienez hirunaka antolatzea, etxe barruan zein etxetik kanpo.

Justu azken bidealde hartan ezagutu zuten mutiko haiek bizitzaren aspekturik krudelena. Ostegun arratsaldea zen, paseo-eguna. Santander aldera irtetea erabaki zuten arduradunek, eta hara abiatu ziren, hirunaka hirigunetik aldendu arte. Batzuek arrantzan saiatzea hautatu zuten, itsasoa zakar zetorrela ohartu gabe. Gazteak ziren, eta arriskuaren susmoa ez da gazteen dohaina izaten. Haiena ere ez. Berehala zabaldu zen seminaristen artean euretako bat itsasora jausi eta uhin apartsuen azpian desagertu zela. Nor ote zen, egia ote zen, izuak hartuta korrika itzuli ziren etxera ordua baino lehen. Buzo eta sorosleek ezin izan zuten eroritako mutila erreskatatzerik izan gau hartan. Ordurako bazekiten nor zen itotako laguna.

Jose Mari Liebana zen. Mutil kantauriarra, seminarioko futbolaririk bikainenetakoa, mutil isil eta zintzoa. Hamalau urte baino ez zituen. Hurrengo egunean ekarri zuten zerraldoa eta eskola-gela batean egin zioten beila haren kide penatuek. Harekin egon zirenak esanda jakin zen Punta Ballena deritzan arroka-muturrean jarri zirela arrantzan, sokak eta amua etxean prestatuta. Harkaitzetan zutunik, arrantzan saiatu ziren, harik eta olatuek zipriztindutako zola labainkorrean irrist egin eta uretara jausi zen arte, uraren astinaldian trabatu zitzaion amua, askatzeko ahaleginean ari zelarik. Zapatak ere materialezkoak omen ziren, konbinazio hilkorra! Begi bat arrainek janda omen zeukan atera zutenean, eta erabat biluzik omen zegoen itsaso bortitzaren adierazgarri. Ez zegoen zer eginik. Bizitzen ikasi baino lehen ate-joka etorri zitzaien Herio, oharkabe bisitan, tropa gazte hura dena abailduta eta galdezka utzirik. Auskalo zenbat sufritu zuten apaiz arduradun haiek erruaren zama arintzeko, zendutako mutilaren familiaren aurrean kargututa, euren baitako erantzukizuna murtxikatuz!

## Lurra galduz zerua irabazi

Itxuraz mutiko politta egiazki politta zen, eta gizon bakartuen eremu hartan kuttun bilakatu zen zenbaitentzat. Abiliorentzat besteak beste. Bere adin-nagusitasunaz edo ahalez baliatuz, inoiz ezer lizunik egin edo proposatu ez bazion ere, harentzat baizik ez zituen begiak. Adiskide egin ziren, bata bestearen hobe beharrez atseginezko erlazio sinbiotikoa mamituz. Abilio ez zen bakarra izan mutiko polittaren irria eta hurbiltasuna bereganatzeko ahaleginean. Juan izan zen beste bat. Gainerako guztiak baino bospasei urte zaharragoa zen. Bigarren edo hirugarren urtean iritsi zen ikastetxera, bi edo hiru erlijio-ordenetan ibili, probatu eta zapuztu ondoren. Esperientziaz eta formakuntzaz ere besteak baino gehiago zen. Pare bat hizkuntzaz mintzo zen, eta atzerrian egona, prestigioz jantzita zetorren. Mutiko polittaren guritasunak liluratuta era guztietako ahaleginak egin zituen harengana hurbiltzeko, haren atentzioa erakartzeko. Zaharragoa zen eta gainera urdaileko gaitzez gaixoturik, *bigarren gosaria* ematen zioten goiz erdiko jolastorduan, hamaiketakoa. Ez zen gauza handirik izango, okaran eta mahats-pasak, zenbait galleta eta katilukada-esne bat. Haietatik erdia, eta aldian behin den-dena, mutiko polittaren kaxoian agertzen zen, hasieran harridura piztu ziona, eta gero, Juanen begirada konplizeak adierazita, atseginezko eskerrona. Izan ere, ondo zetorkion ezusteko osagarri hura, izan ere oso janari pobrea zen otorduetan ematen zitzaiena, inoiz ustela ere bai, adibidez babarrun-kamioikada erosi zutenean, ale bakoitza bere ar eta guzti. Gogoratzekoa da, adibidez, ogi-koskorra eta galleta mordoxka ematen zietela meriendatzeko, eta jakina bi jaki lehorrak irentsi ezinik, patioko iturrian bustitzen zutela errazago barruratzeko.

Mitxoletak baino inozoagoa zen mutiko politta, Juan ere ez zen gaiztoa izango, noski, baina binakako harremanak arriskutsuak kontside-

ratzen zirenez, erdi ezkutuan eta elkarri itzuri eginez bizi behar izaten zuten, beharbada adiskidetasun aberasgarria izan zitekeen harremana. Bekatuzkoa ez zitzaion sekula iruditu, sentimendu hark ez zuen inoiz habia egin bere baitan. Itxura guztien arabera arduradunak ez ziren harreman hartaz ohartu, zorrotzak ziren arren haien azterketak, eta areago sexu-kontuetan, artaldeko inor gal ez zedin.

Bere kabuz, eta noizean behin arduradunak berak deituta bulegora egindako bisitetan —eguna errepasatzeko, pozik ote zegoen galdetzeko, arazoren bat izatekotan konponbidea bilatzeko, kezka astunez barrua hustutzeko, etab.—, ez zizkioten inoiz harreman haiek aipatu. Ohikoak izaten ziren bisita haiek, gustura joan ohi ziren mutikoak arduradunaren gelara —ordu libreetan zein estudio-orduan. Kezkatzekoa zen denboraldi luzez deitua ez izatea. Sarriegi joatea edo maiz deitua izatea ere ez zen seinale ona bada, zerbait ondo ez zihoan adierazle baizik. Bisita haietaz ez abusatzea, beraz noizbehinka tartekatzea, izan ohi zen normaltasunaren erakusle garbiena, eta hartara mugatzen ziren gehienak. Mutiko politta pozik abiatzen zen arduradunarengana, eta oso gutxitan ateratzen zen handik kezkaturik, esan bezala portaera txukuna baitzen berea, oro har. Oso hiztuna zen apaiza, trebea mutikoekin kontu-kontari aritzeko. Gainera maitatua zela sentiarazten zion, estimu handitan zuela adierazten baitzion. Egiten zizkion maitasun-adierazpenak beharbada ez ziren egokienak izango, baina mutiko polittak ez zituen gaitzesten haren laztanak, ez zien erreparorik jartzen musukatze bustiei eta izter-ukituei. Egia esan, ez zituen txartzat hartzen, azken finean urruti zeuden guraso eta senideak, eta gizon hura aita eta ama zen aldi berean, osaba apaizaren laguna izateaz aparte. Apaizaren baitan eta haren atzamar-mamietan zer zebilen ez zekien mutiko polittak, noski, eta egiari zor, ez zen inoiz hargatik kezkatu, ez larri edo estu sentitu, errudun edo gisako zerbait, normala zeritzon haren jarrera amultsua, besterik ezean. Nolanahi ere ez zion inori komentatzen.

Laurogei bat gazte ziren orotara, adinaren arabera hiru gelatan banatuta. Kopuru hura, ordea, urterik urte murrizten zen: izan ere, ikasketetarako dohainik ez, hasierako lilura galduta, gurasoen falta eraman ezinik, edo herriko girotik at etsita, etxerako bidea hartzen zuten askok, seminarioko bahean ale hautatuak baizik geldituz, itxuraz onenak. Gertakari arrunta behar lukeena drama bihurtzen zen. Ustea zen begiraleek amuan itsatsita ekarritako mutikoak apaizgaiak zirela berez. Jainkoaren atzamarrak ukituak, bokazioz hornituak. Gehien-gehienak haurtzaroan apartatuak izan ziren herrietako eskoletan, baina baziren batzuk adinean aurreratuagoak, itxuraz Jainkoak berandu begiz jotakoak. Eta haiek berebiziko prestigioa zuten tropa hartan, zirenagatik baino gehiago atzean utzi behar izan zutenagatik: gurasoak, etxea, lana eta —o miraria!— neska-laguna. Kasu batean zein bestean Jainkoak berak aukeratua izatea zen ideia nagusia, misio handi baterako aukeratua, alegia. Behin goldean hasiz gero zeregina zapuzteak Jainkoari muzin egiteak esan nahi zuen, zenik eta bekaturik larriena alegia, eskergaiztoko mutiko gizajoa infernuko atarian jarriko zuena. Pentsa nolakoa izango zen tropako kideen durduzamendua haietako batek bokazioa uztean.

Familia handia osatzen saiatzen ziren arduradunak; beraz, norbaitek alde egitea guda-zelaian senide bat galtzea modukoa zen; eta mutil hura norbaiten laguna izanez gero are okerragoa. Galera mingarriaren sentimendua senide galduarekiko erruki bihurtu ez ezik beldurraren hazia ereiten iaioak ziren apaiz haiek, bakoitzaren ahalmenaren arabera dramatismo gehiagoz ala gutxiagoz. Etxera alde egin behar zuenak normalean ez zion inori bere erabakiaren berri eman ahal, lagun mina izanda ere ez, isilik gorde beharra zeukan ustez sakonean traizio huts zena, zintzo jarraitzen zutenen gogoa erakartzeko kutsakorra izan zitekeelako. Kasu batzuetan gogorrago jokatzen zuten arduradunek, mutiko ernegatua alde egiteko ordua iritsi bitartean gainerakoen bistatik erretiratuz badaezpada, azkeneko

gaua gela berezi batean pasaraziz. Bereziki mingarria irizten zioten apaizgai nerabeek halako neurriari, gutxitan hartzen zena berau, ernegatuaren erabakia aldez aurretik hedatzen zenean adibidez, nekez uler baitzitekeen zertan eragin zezakeen azken gau batek gelditzen zirenen aldartean. Halaxe egin zuten Barbarin eta Agirre nafarrekin, Anuntzibai arabarrarekin.

Nolanahi ere ondo baliatzen zuten arduradunek abagune hura, gainerakoak kaperan bildu eta gogoeta gordinak egiteko: ernegatu haiek bokazioa galdu zutela, inoiz kargu hartuko ziela Zeruko Aitak, oso larria zela haren deia zapuztea, kontuz ibiltzeko gero! Bereziki hunkigarria izan zen Santiren kasua. Asturiar kankailu bat zen, aurpegian nabariak zituena akne amorratuaren orbanak. Ospetsua zen seminarioan bere ateraldi eta zirtoengatik. Bada, egun batean alde egin zuen hark ere, eta, auskalo zergatik, berebiziko zirrara eragin zion apaiz arduradunari, negarretan igarri baitzuten mutikoek. Handik aste batzuetara, gazteak kaperan bilduta zeudela ohiko otoitzean, Santiren eskutitza irakurri zien: “Kaixo adiskideak, etxera orduko garraio-enpresa batean hartu naute lanerako. Zori handia izan dut. Beraz, Gerposako kamioitzarrak hortik pasatzen direnean, xuxurla ezazue otoitza bat nire alde”. Gerposako flota askotan pasa ohi zen Asturiasetik Bilbora bidean. Astetan iraun zuen eskutitz hark eta ondorioz Santi, gaztetxo haien gomuta larrituan.

Bokazioa galtzeko arriskuaren ondoan bazegoen ifrentzu gozagarria gazteei behin baino gehiagotan gogorarazten zitzaiena, lasaiago bizi zitezen bideari eta langintzari eutsiz. Ziotenez, Amabirjinak berak agindu zion Aita Fundatzaileari —Antonio Maria Claret i Clarà katalanari— ordena barruan hildakoek segurtatuta zeukatela zerua, eta beraz “promesa kontsolagarri” hura ukendu bilakatzen zen Jainkoak debalde aukeratutako mutiko haien bihotzetan. Halako suertea, me-

rezi gabe lortua! Ergela izan behar zen halako pagotxa alferrik galtzen uzteko!

Mundutik aldenduta bizi zirenez hautatuen planetan, nekez sartu ahal ziren seminarioan kanpoko gertakariak. Urtean behin etortzen ziren bisitan gurasoak eta anai-arrebak, eta urtean hilabete bat itzultzen ziren seminaristak jaioterrira, baina, gazte polittaren kasuan, ez zioten aire berririk ekartzen. Yuri Gagarin zeruraino igoa zen satelite tripulatu errusiarrean, Amerikanoek Bahía de Cochinosen lur hartu zuten Fidel eta enparauen iraultza zirikatzeko, Euskal Herrian puri-purian zegoen borroka iraultzaile armatu abertzalea, baina halakorik ez zen ikastetxeraino iristen, eta familian ere ez zen aipatzen. Egunkaririk ez zuten irakurtzen, irratia entzuten ere ez. Telebista, berriz, iritsi berria zen apaizen bizitzetara.

Jantokian arrunt isilik jaten zen, baina, hala ere, apaiz arduradunak musikazale zirenez, musika klasikoa jartzen zieten maiz, zaletasun hura seminaristengan txertatzeko. Beethoven, Chopin, Mozart, Rimski Korsakov eta Anton Dvorak ia-ia etxeko egin zitzaizkien. Beste batzuetan norbaitek irakurtzen zuen, txandaka, bazkaldu bitartean besteek entzun zezaten. Gerra zibilean gorriek akabatutako seminarista eta apaiz klaretarren biografiak izan ohi ziren sarrienak, gazte haiek apenas zekiten arren zer gertatu zen 36an. Edozein moduz hildako haiek familiakoak zituzten kasik, kausa bereko martiriak, eurek bezala apaiz izan nahi zuten gazteak edo seminarioan bizi ziren beste apaiz edo legoak bezalakoak —ia laurehun hildako, ia denak katalanak eta aragoikoak—; hiltzaileak, aldiz, gorriak, beraz, gaizto odol-goseak halabeharrez.

Urte haietako gertakizunik handiena Vatikano II.a Kontzilioa izan zen, Juan XXIII.aren ekimen distiratsua. José Luis Martín Descalzo

apaiz gazteak *La Gaceta del Norte*rako idatzitko kronikak irakurriz ezagutu zituzten Kontzilioko gorabeherak, adibidez zeintzuk ziren kardinal aurreratuenak —Suenens—, eta atzerakoienak —denetan atzerakoiena Karol Wojtila—. Mutiko polittak Martín Descalzo izan nahi zuen, hura bezain kazetari, batik bat *Un cura se confiesa* jantokian irakurri zutenetik, gotzainak, kardinalak eta beste urrutiegi geratzen baitzitzaizkion.

Giro hartan bizi zen mutiko politta, arazo handirik gabe, egia esan, bere bokazioari modu nahiko naturalean eutsiz, ustez bizitzeko behar zuen guztia bertan aurkitzen zuelarik, mundutik aparte noski, baina ze mundu eta ze munduondo, etorriko zen garaia mundura jaisteko. Bitartean, hobe hantxe jarraitzea, ordenaren abaroan aterpetuta. Apaiz izan nahi zuen, fraide klaretarra, horretan ez zeukan zalantza-izpirik. Hirugarren urteko Gabonetan gertaturikoa ere ez zen bide hartatik aldentzeko haina izan.

## Komedia ezin serioagoa

Komediak egin ohi ziren Gabonetan, alegia antzerkia jokatzen zen. Antzezpen haiek, Galeria Salesianokoak, aski barregarriak ziren estu hartuz gero —emaztearen tokian arreba, neskaren ordez ama—, baina oso gustura jokatzen zituzten mutikoek, besteak beste eguneroko errutina apurtzeko ez ezik gaitasun ezkutu eta ustiatu gabeak azalera ekartzeko balio zutelako.

Urte hartan, auskalo noren iniziatibaz —abesbatzako zuzendaria behintzat, Gineako beltz bat zen, N´dongo— pare bat abesti euskaraz kantatu zituzten: *Bautista Basterretxe* eta *Txiribogin andrea*. Ohiz

seminarioko kide eta komunitateko apaiz eta legoek osatzen zuten publikoa, antzokirako hainbat mahai, aurreko dozena erdi bat ilara, erretiratuta. Egun hartan, ordea, aita nagusiak herriko zenbait lagun gonbidatu zituen, eliztarrak eta familiakoak. Hartara, egun berezia zirudien hura, inoiz ez bezalakoa, parerik gabea, norberaren onena ematea merezi zuenetakoa. Zabaldu zen zutoihala eta mutikoak dardarka sentitu zituen zangoak. Begi borobil bi antzeman zituen, beltz-beltzak, irribarretsu berenetan iltzatuta. Rondallak piezak jo ondoren txaloka altxatu zen bi anpulu distiratsuen jabea, adats gaztainkarako neska ederra. Zalantzarik ez zegoen mutiko polittarentzat zirela esku-zarta haiek. Hala uste izan zuen berak, hutsik egin gabe. Nor ote zen jainkosa hura? Aita arduradunak, neskak eta emakumeak oro har aipatzean *las pelonas* esaten zuen erdeinu harrigarriz. Ez zirudien ba erdeinua merezi zuenik agerkunde hark!

Hurrengo asteetan igandero azaltzen zen neska hura seminarioko galerian, aita nagusiaren alboan, eta berehala ohartu zen mutiko politta haren presentziaz. Egia esan, atezuan zebilen, eta nolanahi ere, ez zen batere aztia izan behar neska bat antzemateko beltzez jantzitako gizonezkoen eremu idor hartan. Hantxe zegoen galeriaren erdian, airosa eta lirain, itxuraz norbaiten bila, mutiko polittaren peskizan nonbait, hura agertu zenean alaitu egin baitzitzaion aldartea, keinu herabe batez agur eginda adierazi zionez. Gero, desagertu egin zen, ezer esan gabe, mutikoa irribarre hartatik luzaroan esekita utziz. Aita nagusiaren iloba zen neska segail hura, Maribel.

Neska hura berrikustea bilakatu zen aurrerantzean mutiko polittaren zeregin pozgarriena. Eskasak ziren abaguneak, noski, horietako bat igande goizean, komunitateak kanpokoentzat zeukan elizan. Harrez geroztik meza nagusira etortzen hasi zen Maribel, eta mutiko politta miresgarria iritzi zitzaion. Gutxienez astean behin ikusteko

moldatu zen, Abilioren laguntzarekin. Herritarren meza-orduan ikasgela nagusian egoten ziren seminaristak, denak batera, ikasgaiak prestatzen, etxekolanak osatzen, irakurtzen, etab. Handik ez zegoen baimenik gabe ateratzerik, eta susmoak iragarri gabe ihes egitea ezinezkoa, gelaren erdi-erdian baitzegoen bere pupitrea. Abilio atzeko partean jesartzen zen, ordea, eta bien artean asmatutako seinale-sistemari esker, mutiko politta altxatu, begiraleari komunera edo apaizen bulegora joateko baimena eskatu eta goiko logelara abiatzen zen lasterka, eskailerak launaka igoz, goiko leihoetatik ia-ia-zintzilik, eliztarren joan-etorriak kontrolatzen zituen. Inoiz Maribel antzeman gabe erretiratu beharra zeukan; gehienetan, ordea, arrisku larri hartatik saria jasota itzultzen zen ikasgelara, eseri aurretik Abiliori emaitzaren berri emanda, keinuz: batzuetan neskaren oinetakoak, beste batzuetan soinekoaren mendela edo ile-adatsaren mugimendu burgoia, eta zenbaitetan gorputzez oso-osorik ikusita, bihotza taupaka, zintzo-planta eginez, hurrengo igandearen itxaropenez. Leihoko talaiatik ez zuen neskarekin hitz egitea lortu, horretarako beste zerbait asmatu beharko zen, hagitzez larriagoa. Kalera ateratzea beste aukerarik ez zegoen.

Beste behin Abilio izango zen bermea. Kirol-tresnen eta gainerako trasteen arduraduna zenez, bazuen kalera irteteko baimena erdiesterik, erosketa xume batzuk egiteko, eta hala biak elkarrekin ateratzeko ohitura hartu zuten. Baimena soilik batentzat izaten ohi zenez, mutiko polittak ez zeukan seminarioa uzterik; beraz, harrapatuz gero, auskalo zer gerta ahal zitzaien. Etxerako bidean jarriko zituzten, seguru! Edozein moduz beti ihardets zitekeen Abilio bakarrik ez uztearren atera zela, ustez... Zorionez ez zen gezurra esan beharrik izan, izan ere ate nagusitik irteten ziren arren, sekula ez baitziren ihesaldi haietaz ohartu. Arratsaldeko jolasordua baliatuz, arduradunak non zeuden ondo kontuan hartuta, Ronda kalean gora gasolindegiraino

jotzen zuten eta, han ezkerretara eginez kale estu batean gordetzen ziren, inoren begirada gaiztotik babestuta Maribel iritsi bitartean. Berandu gabe heltzen zen, beti bezain irribarretsu eta erakargarri, ezpain mardoak gorriz pintatuta. Handik behera mutikoak ez zuen deus ikusten, lilurak estututa. Ordu laurden bat-edo egongo ziren elkarrekin, neska osabaren beldur, bi seminaristak arriskuan itsututa. Hamazazpi-hamazortzi urte omen zituen Maribelek, nobioa ere bai, baina tira, eurena uztekotan omen zeuden mutila astazakil samarra zelako edo antzeko zerbait. Abilioren adinkidea izan arren, mutiko polittak erakartzen zion arreta neskari, kuriositatea, jakin-mina edo dena delakoa. Musu ematen zioten elkarri agurrean eta solasaldi-bukaeran, musu inozoa, masailean, eta kalezulo hartan egon ohi ziren kalakan seminarioan susmorik ez sortzeko tarte laburrean. Beltzez jantzita zebiltzan mutikoak, beraz nabarmena izan zitekeen haien presentzia herriko neska ikusgarri batekin berriketan, aita nagusiaren ilobarekin hain justu, baina inork ez zien sekula ezer esan, eta seminarioan ere ez zirudien inor ohartu zenik. Edo bai. Bazen apaiz erdi itsu bat, uste baino gehiago ikusten zuena-edo, eta behin, hauxe aipatu zuen bi iheslarien, eta beste batzuen, aurrean: “Nik hitz egingo banu, gauza asko aldatuko lirateke hemen batzuentzat...”.

Hilabeteak joan ziren horrela, urtarriletik ekainera. Mutiko politta astero igotzen zen leihora eta hilean pare bat aldiz ateratzen kalera. Gertakari hark, ordea, ez zuen sakonean ezer aldatu. Pasadizo gozoa izan zen, maitatua edo behintzat neska batek aintzat hartu izanaren atsegina sentitu zuen; berak, ordea, apaiz izan nahi zuen, eta Maribelek bazekien garbi asko, mutikoaren ahotik entzunda. Hartara, ikasturtea bukatuta, hirugarren seminariora aldatu zen mutiko politta, nobizioaldia egitera, neskaren arrastoa betiko galduz. Ordurako Abiliok utzia zuen seminarioa. Apenas abisurik eman gabe desagertu zen, “banoa” biluzia esanda.

## *Kartzela-txokoan, beti erne (3)*

*Hilabete bat falta da kartzelaldiaren lehen urtealdia amaitzeko. Larunbat arratsa da, eta txaboloan nago isiltasun ederrean irakurtzen. Xabier Montoiaren Golgota daukat eskuartean. Giro tristea, bustia eta izoztua da Gaztelerriko lautada-puska honetan egiten duena. Nire leihotik lursail batzuk ikusten dira eta zeru-zelai zabala. Lur-sailak goldatu dituzte egunotan, kolore horizta kolore marroiak ordezkatu du, lur-kolorea du orain soro-multzo honek. Lurra eta mendia bat eginda daude koloreari dagokionez. Alabaina bilo berde bat atera zaio zabaluneari. Gari-lastoen zuztarrak edo lur harrotuak gordetzen dituen hazi hilezkorren aztarnak izango dira. Goizean, euririk ez badu egiten bederen, idorrago dirudi sorotzak. Horrelatsu mantenduko da udaberrira arte. Sekulako euri-jasak bota ditu azken egunotan. Ez nekien hainbeste euri egiten zuenik alde honetan. Nire txaboloa beroztatuta dagoen arren, kartzelako ziega bat da. Eta leihoko burdinek, askatasunaren muga erakusten didate. (...)*

*Basaz beteta dago errepidearen ondotik zeruaren kontra bukatzen diren mendixketaraino. Kartzelako hormek ere basa-kolorea hartu dute. Teilatuetan, txapa. Patioetako hormigoia eta horma bustiek dena bat dirudite, norbaitek planoak egin zituenean neguaren kolore arre hau kontuan hartu izan balu bezala.(...) Gaur tenperatura nabarmenki jaitsi da. Berehala iluntzen du hemen, eguzkiaren azken errainuek jotzen dute nire begiradapeko soroetan. Erdizka ilun dago, margul, errepidetik harago dagoen herena alegia, argitasuna gordetzen du doi-doi. Zeruan laino beltzaren bat edo beste dabil, mendi-puntaren ondoan trazo lodiagoa marraztuz. Nire txaboloko isiltasuna beste norbaiten flamenko-hots urratuak garrazten du. Doinuera horrek presoen intziria adierazten du*

*ondo. Garrasi-kantu hori inor baino hobeto egiten duen Emilio zigorziegara eraman dute. Zergatik eta funtzionarioaren geldotasuna salatzeko ostikoa hartu duelako galeriako atea. Ze gutxi behar duten batzuek zigorra gupidagabe astintzeko. Azaldu didate Emiliok madero bat garbitu zuela kalean. (...)*

*Santa Ageda eguna da. Oso modu dramatikoan bukatu da eguna moduluan: gazte batek bere buruaz beste egin du, txaboloan urkatuta. Antza denez, siesta-orduan izan da. Lau t'erdietan patiora jaisteko orduan ateak ireki dituztenean, goiko ohetik zintzilik topatu dute mutila. Pultsua ba omen zuenez, manta batean bilduta atera dute baina berehala hil da. Kartzela bateko txabolo batean, bere buruaz beste eginda, bakarrik, eta oinazez beteta. Izan ere gazteak bikotekide trabestia zeukan, brasildar ederra, eta atzo bertan abandonatu zuen neskak. Neronek ikusi nituen haserre beheko galerian. Elkarrekin zeuden txaboloan, eta atzo arratsaldean alde egin zion, beste batekin batzeko. Dirudienez, ezin izan du mina, edo lotsa, edo auskalo zer jasan, eta urkatu egin da. Hogeita lau-bost urte baino ez zituen. Ekuatorekoa zen.*

*Kartzelan heriotzak sentimen hitsak sorrarazten ditu. Edozein moduz, Vanessaren negarrak eta zotinak baino ez dira entzun; eta bazterretan kuxkuxeoa. Nik kartzelan hildako preso euskaldunak dauzkat gogoan, haien sufrimendua, nola iritsi ote ziren une horretara: Krakas, Kattue, Lopetegi, Oihane, Angulo. Kartzelak hil ditu, esan ohi da Euskal Herrian, eta halaxe da ezbairik gabe. Gogorra da heriotza; espetxean, berriz, hotza, bihozgabea: hilotz esaten dugu euskaraz, hotz geratzen delako gorpua, eta hotza eragiten duelako. Batek dionean "kitto", amaitu da, akabo. Noiz iristen da bat puntu horretara? Bat baino gehiago dago modulu honetan edozein momentuan pott egin dezakeena, nabari zaie begietan sufrimendua, eta oinaze etengabeak itsutu egiten ditu. (...)*

*Larri ez baina urduri bagaude. Lehen aldiz Dueñasera iritsi naizenetik urduri nago, eta nire kideak ere bai. Izan ere mugimenduak daude gure inguruan, eta jendea lekuz aldatzen hasi dira. Atzo hauteskunde-eguna zen: eginkizuna beteta modulura itzulirik, medikuarengana joan nintzen botika batzuk eskatzeko. Aldi berean Iñakiren txartela eraman nion, hark ere botika bat behar zuelako, eta ordu horretan ospitalean zegoen. Mediku andereak esan zidan: "Si este señor está de conducción...". Kundan, Iñaki? Kundara joatekotan atera dute modulutik gure agurra ekiditeko, baina etxera joan da Auzitegi Gorenak hola erabakita. Hau bai albiste ederra! Pablok suerte txarragoa izan du: Herrerara bidali dute bueltan, lehenengo graduan gainera. Hara hemen nola gradu-sistema zigor-sistema bilakatzen den: nire kausa berberean dago Pablo, nik baino kondena laburragoa dauka, eta hala ere berari lehenengo gradua ezarri diote: bi patio-ordu; aldiz, nik sei-sortzi dauzkat egunean. (...)*

*Kartzelan gaude eta ez gaude seguru. Ez dugu egoera kontrolatzerik. Euren eskuetan gaude. Gauzak ez daude logika gizatiarraren harian; arbitrariotasuna da arau. Gaur balio duena bihar ezdeusa da. Aste honetan aurrez aurreko bisitetan lagunekin egotea kendu digute: "Ordenes de Madrid", edozeren zurigarri. Argi dago zer den eurentzat gizarteratzea, sistemaren muina. Gizarteratzea damutzea da. Edo damutze-plantak egitea, kidea salatuz. Hori eginda, libre onurak. Zer ordea, guri? Zertaz damutu behar dut nik? Berdin dio. Zorionez, oso une orekatuan harrapatu nau. Gainditu dut sarrerako desoreka eta despistea. Sasoian nago eta eutsiko diot datorrenari. Ez nuke hemendik mugitu nahi etxeratu arte. Utz nazatela bakean. Baina ez da hori euren asmoa, gu desorekatzea baizizk. (...)*

*Psikologo andereñoa etorri zait, sei hilabetean behin egiten diguten azterketa baliatuz. Ea ETArekin kolaboratzeagatik sartu nauten. Hori epaileari esan diodala, eta kartzelatu nautenez amaitu dela kontua. "Ez didazu esango zer galdetu behar dizudan?", bota dit zakar. "Ez, baina uste nuen psikologoek osasunaz, egoeraz, barne-orekaz eta antzeko gaiez galdetzen zutela". "Ez baduzu kolaboratu nahi, bukatu dugu".*

# -IV-

Aguraingo komentua errota zahar bat izana zen noizbait. Herriaren bazter batean kokatua, Zadorra ibaiaren alboan galsoroz eta ortuari-sailez inguratuta, Zuazorako bidean, kaskoan inguru osoko ur-hornikuntzako biltegia gordetzen zuen muino baten abaroan. Aspaldi fraidetxea bihurtua, apaizgaien kalitatea neurtzeko gunea bilakatu zuten klaretarren seminario-sistema barruan, berebiziko garrantzia zuena ordenaren etorkizunerako, izan ere hantxe aukeratzen baitziren, bahe estutik pasatuta, fraide izateko eta elkartearen biziraupena bermatzeko gazte aproposenak. Oso ezberdina zen aurreko bi seminarioen aldean: haiek herri barruko eraikinak ziren, hau berriz nekazalguneko etxalde izateaz gain erretiratuta zegoen, tamainako laborategiari zegokionez. Trenez iristen zen Agurainera, eta mutiko politta bakar-bakarrik heldu zen. Hamabost urte ondo eginak zituen, eta beraz, ez zuen aitaren laguntzarik beharrezkotzat jo bide hartarako. Maleta xumea eskuan, herria gurutzatu, eta ondo ikasitako oharrei jarraituz, komenturantz abiatu zen, oinez, pauso garrantzitsua ematen ari zen uste osoz, bakar-bakarrik.

Agurainera joateak familia ia erabat baztertzea zekarren. Urte oso batean ez zituzten gurasoak eta anai-arrebak ikusi ez entzungo, jaioterria ez zuten zapalduko, eta hango arauak eta ariketak ongi gaindituz gero elkarteko kide eginda bukatuko zuten: erronkak merezi zuen. Herritik barrena zetorren galipotezko errepidea utzi eta luzera osoan platanondo-lerro bana zuen bide estu legarreztatuan sartuz egurrezko atetzarreraino iritsi zen mutiko politta. Zain zeuzkan arduradunak, eta barruko patioan hainbat kide ezagun, bera baino lehen, bakoitza bere kabuz eta moduz etorrita, talde osoa iritsi bitartean itxaroten. Berehala neurtu zuten komentuko eremua, batik bat

nobedadeei erreparatuz: klaustroa eta frontoia, gaztainondo erraldoia, haren itzalean lasai egoteko esertokiekin, ibaia, zubitxo baten gainetik gurutza zitekeena, eta harago, buztinezko futbol-zelaia, eta bereziki-bereziki, soroen aldamenetik lasai ibiltzeko bidezidorrak, eta mendi-muinoa, nora joaterik bazegoen agintarien baimenez, jolasteko edo, besterik gabe, pasieran, Aizkorritik edota Urbasatik ufaka zetozen haizeak dastatzeko.

Berehala ohartuko zirenez, klima askoz zorrotzagoa zen, haize zakarrak astintzen zuenean edo elurrak baratzak zuriz janzten zituenean. Beroa ere astunagoa zen udaroan, uzta joritu ahala. Gainerakoan berdintsu zen dena, azaletik begiratuta: kapera, gela nagusia, jantokia, lo egiteko galeriak. Alabaina, muinera joz gero, baziren pare bat gauza hango egonaldia erro-errotik desberdin egingo zutenak: ikasketa akademikorik ez zen izango, eta gutxienez otorduetan, fraideak eta fraidegaiak elkarrekin egongo ziren jaki berberak dastatuz, otoitz berberak eginez, irakurketa berberak entzunez isilik jaten zuten bitartean. Elkarte bereko bi taldeak sotana beltzez jantzita ibiliko ziren, apaizak eta legoak komunitateko kide oso zirelako, eta seminaristak —nobizioak orain— horixe nahi izan nahi zutelako, horrela elkarren arteko hurbiltasuna adieraziz. Harrez geroztik, beraz, sotana izango zen kidetasunaren ikur nabarmena. Aitzitik alde handia zegoen bi taldeen artean, noski: adibidez, fraideek banakako gelatan lo egiten zuten eraikinaren hegal batean, gazteek aldiz, galeria komunetan, beste hegal batean; fraideak maiz ateratzen ziren komentutik, predikatzera edo ordenako bileretara; gazteak aldiz, inoiz ez, eta oro har, ordutegi, zeregin eta betebehar desberdinak zeuzkaten batzuek zein bestetzuek.

Seminario-sisteman funtsezkoa zen nobizioaldia egitea, gazteentzat aurrera edo atzera egin nahi ote zuten patxadaz erabakitzeko, eta komunitate helduarentzat kide izan nahi zuten haiek gertutik eza-

gutzeko. Horren arabera, moztu egiten ziren ikasturte akademikoak 5. urteko batxilergoa egin ostean —gero ere egongo zen ikasteko denbora—, eta ordenaren arauak, tradizioak, eta konpromisoak zein norberaren bokazioaren esanahia aztertzen ziren urte oso batean begirale prestuen laguntzaz. Gauzak egoki eta taxuz joanez gero obedientzia-, kastitate- eta pobretasun-zina egin beharko zen, eta hori, jakina, ur handitan sartzea zen beste edozein zereginez kezkatzeko. Nobizioen *maixua* gizon luzanga bat zen, jatorriz Otxagikoa, abizenez Jaurrieta, kimikan lizentziatua, bokazioa *berandu* antzeman zuen gutxi haietako bat, traturako egokia, hurbil samarra eta zorrotza, serio eta dibertitua aldi berean.

Mutiko polittak biziki nahi zuen beharrezko urrats guztiak eman, hasiera-hasieratik zegoen hartarako prest eta gogotsu, zalantza-izpirik gabe, baina ez berak, ez bere kideak, ez ziren benetan jabetuko urratsaren tamainaz, are gutxiago kanpoko bizimodu eta baldintzekin kontrastea egitea ez zegoelarik. Alabaina hori ez zen mutiko haren ardura, Claretek atondutako bidetik Jesusen jarraitzaile zintzo izatea zuen xede bakar: errota izandako etxalde hartan mutikoen alea xehetzen zuten irinaren bikaintasuna arakatu eta gainerakoei jaten emateko egoki zenetz erabakitzeko. Jainkoak haraino ekarritako ale samur haietatik ahalik eta gutxienak alferrik galtzea zen nobizioaldiko helburua, norberak ez ezik arduradunek lasai eta aratz antzeman behar zutena. Beraz, alde hartatik so eginda ez zen urtebete galdua, irabazia baizik, hurrengo urratsak—bizitza osoa baldintza zezakeena— sendo eman ahal izateko.

Sotana beltza beti gainean eramatea ez zen erraza izan, hasieran bederen hanketan trabatzen zen gona luze hura, eta eskailerak igotzeko, adibidez, nahiko lan ematen zuen. Lo egin eta dutxatzeko izan ezik ez zegoen hura inoiz kentzerik —komentuko imajinarioan esan

ohi zen hura zela biziarteko jantzia eta heriotza ordurako mihisea, pentsa!—, eta adibidez frontoian pilotan aritzeko edo buztinezko zelaian futbolean jarduteko gogaikarria izan zitekeen, hala ere denborarekin ohitu egiten zen. Gainera bazituen abantaila garbiak ere, negu gorrian babesgarria eta azpiko arropa zarpail samarra ezkutatzeko estalgarria baitzen. Ordura arte etxekoek erosi eta bidaltzen zioten arropa —gutxi-asko familia bakoitzaren ahalen arabera—, orduz geroztik elkarteak jarriko zuen dena: barruko jantzi zuriak, praka-parea, alkandorak, jertseak, galtzerdi lodiak eta finak, oinetakoak, dena denentzat berdina. Hasieratik eta praktikan ikasi beharra zegoen elkartea zela familia bakarra, eta etxeko ondasunak berdin banatzen zirela senideen artean, bakoitzaren premien arabera, bai, baina inongo bereizkeriarik eta kuttunkeriarik gabe. Arropa, gainera, janzteko zen, gorputzari babes eta estalgarri —sekula ez apaingarri edo erakusgarri— gerta zekion. Horretan ez zegoen salbuespenik.

Jatekorik ez zen falta, etxalde hura bereburu zen hein handi batean: arrautzak oilategian, txerrikia eta esnea kortan, ortuariak eta eltzekaria baratzetan —patata bereziki Arabako lautadari zegokionez—, fruta errekondoko fruta-arboletan —okaranak, sagarrak, madariak, mertxikak, etab.—. Ogia, arraina eta haragia izan ezik ia dena ematen zuen etxaldeak, legoen lanari esker. Ugari banatzen zituen Jainkoak bere ondasunak aukeratuen lerroetan. Xume-xumea zen dena, nahikoa hala ere ondo elikatuta mantentzeko, mutikoen jatorriko hainbat etxetan baino hagitzez hobeto, zalantzarik gabe.

Otoitza eta gogoeta ziren eginbehar bakarrak, ez esku-lanik, ez gainontzekorik. Ordu luzeak eskaintzen zitzaizkien egunean bi zeregin haiei. Otoitza goizez, eguerdiz, arratsaldez, ilunabarrean eta gauean; otoitza otorduetan, loa burutu artean eta esnatzean; otoitza etxetik irteteko, etxera sartzean, eta tarte libreetan. Gogoeta, berriz, gela

nagusiko egonaldi luzeetan; gogoetak maixuaren eguneroko konferentzian edo hitzaldian; gogoetak kaperako irakurraldi aukeratuen harira; gogoetak erretiro-egunetan eta aldikako gogo-jardunetan; gogoetak, etengabe. Jainko-esperientzia gora eta behera jarduten zuten apaizek, eta kide batzuk begiak zuri egon ohi ziren kaperan esperientzia haren mende-edo, auskalo. Mutiko polittak ez zuen zorioneko esperientzia hura sekula santan sentitu, asko jota bake-antzeko zerbait giro hartan murgilduta, baina ukatu ez zegoen ukatzerik, huraxe baitzirudien urte hartako ardatza. Zer ote zen hura, ordea? Berak apaiz izan nahi zuen, fraide bihurtu elkarte hartan bere bi osabak bezala, botoak egin behar baziren, egin, eta ahalik eta txukunen jardun, zintzo jokatuz, elkarteko eskakizun nagusiak betez eta guztien baldintza berberetan bizi. Misteriorik gabe. Claret fundatzailearen eta haren lehen jarraitzaileen —Clotet, Xifré eta enparauen— biografiak gertu-gertutik miatu zituen haien mailan jarduteko amets eginez, hura demostratzeko txanda noiz etorriko.

Santa Teresita Lissieuxkoa, San Estanislao Koskakoa, San Luis Gonzaga, Santa Teresa Jesusena, Donibane Gurutzekoa, Fray Rafael, etab. ia-ia adiskide bihurtu zitzaizkion, baina berezien-bereziénak, gazte haien heroiak alegia, Gerra Zibilean akabatutako fraide eta seminaristak ziren, ehunka fusilatu gizajo haiek, adin-lorean jazarri eta garbitutako kide eredugarriak: bizia eman! Katalunian zuen jatorria elkarteak, beraz herriko kaleak bezain ezagunak egin zitzaizkion Vic, Sallent, Manresa, Sabadell, Mollerusa, eta Aragoiko Solsona, Barbastro, etab., hara zabaldu baitzen lehenengoz elkartea behin errotu ondoren. Gertakari epiko baten atalak bailiren entzuten zituzten, kide martiriek ezkutuka eta kaleko jantziz mozorrotuta ihesean aurkitutako masia, borda eta etxezuloetan milizianoek tirokatu eta hil artekoak. Mutiko polittak, ordea, beste aurkikuntza bat egin zuen, bere kabuz. Liburu batzuk arakatuz, Charles de Foucauld

eremita, Pobreen Anai-Arrebatxoen fundatzailea topatu zuen, eta erabat liluratuta geratu zen hark Tamanrasseteko basamortuan egindako bizikizuna. Umetan kartusiarrak iruditu zitzaizkion imitagarri, monje bakartuak alegia, eta orain, tuaregen artean bizi eta erahildako beste bakartu bat! Bitxi samarra Claret *aktibista*, misiolari ibiltariaren jarraitzaile izan nahi zuen batentzat, baina halaxe gertatu zen, eta ez zuen inorekin partekatu aurkikuntza hura.

## Hiru zinak prestatzen

Nobizioaldia kristautasunaren birtute nagusiak ikasteko epea zen, hauexek, alegia: umiltasuna, sakrifizioa; eta bizitza erlijiosokoak: obedientzia, pobretasuna eta kastitatea. Azkeneko hirurak zin egiteko gaiak zirenez, funtsezkok ziruditen, eta berariazko tratamendua merezi zuten, baina modu bereziki irmoan lantzen ziren lehenengo biak: alegia, umiltasuna eta sakrifizioa. Umiltasuna esaneko izateko; beraz, obedientzia ziurtatzeko; eta sakrifizioa norberaren gaitasuna frogatzeko ez ezik Jainkoari zerbitzura eskainia bizitzeko, azken finean ereduaren erara jokatzen ikasteko, Jesus maixuaren jarraitzaile izateko baitzeuden gazteak errota zaharrean. Bai batak, bai besteak, bazuten artifizialtasunetik franko. Izan ere, bizitzak berak apala izateko eta zintzo jokatuz gero —eta zer esanik ez besteen alde bizitza emateko—, naturalki datorren sakrifizioa onartzeko prestatu ordez, propio probokatzen ziren umiliazioak eta sakrifizioak, bitarte baino gehiago helburu bailiren. Hartara, ohikoa zen norberak bere buruari sakrifizio batzuk inposatzea, adibidez: otoitz egiteko orduan zutik edo besoak zabalik ipiniko naiz; edo eguerdiko otorduan ez dut postrerik jango, edo azken mokadua (goxoena) platerean utziko dut.

Ankerragoak ere bazeuden —mutiko polittak inoiz egin ez zituenak—: adibidez, aste honetan zilizioa lotuko dut hanketan edo besoan, alanbrezko arantzak haragian sartu arte. Beraz, norberaren irudimenak askotariko sakrifizioak ezarri ahal zizkion bere buruari, halako kontabilitate makabroa egiteaz gain noraino eusteko gai zen neurtu ahal izateko. Umiliazioak, ostera, bekatuarekin edo egunean zehar nobizioek egin zitzaketen akatsekin lotzen ziren. Horren jakitun, nobizioak barkamena eskatu ahal zuen kide guztien aurrean, iluntzeko hitzaldi orduan, belauniko jarrita edo zutik, eta maixuak penitentzia ezarriko zion, sarri komunitate osoaren aurrean betetzeko: jantokira sartzerakoan ate ondoan ipiniko zara, kideak pasatzean zure aldeko otoitz eske; edo kasu nabarmenagoetan, jantokira sartzeko orduan zabal-zabalik etzango zara lurrean gainerakoak zure gainetik pasatzen diren bitartean; edo aita nagusiari zigorra eskatuko diozu haren aurrean belauniko edo hauspez jarrita, nahierara. Maitasuna, justizia, lagunartean bakezko izatea eta antzekoak ez ziren apenas aipatzen, beraz uste izatekoa zen ez zirela funtsezkoak izango, ez behintzat funtsezkoenak edo premia-premiazkoenak.

Jesus bezalakoa edo antzekoa izatea, hari jarraitzea. Hartara iristeko Jainkoaren nahia bete behar zen, eta hura zein zen jakiteko, entzumena findu. Jainkoaren borondatea egin, norberarena ukatuz. Norberak pentsatzen zuenak ez zeukan garrantzirik, norberarengandik apetak, gurariak, grinak ateratzen baitziren, nola ziraunak bere habiatik, eta haiek jariakin zikinak ziren, norberekoikeriaren fruitu, emari pozoitsu, egoismo hutsa. Beraz, desioak desterratzean zegoen sekretua, edo primeran bezatzea. Hartarako gai zenak bidetik sastrakak eta belar gaiztoenak kenduta zeuzkakeen, arrakastatik gertu egon zitekeen. Izan ere harrabotsean ez zegoen Jainkoari entzuterik, norberaren gogoaren oihartzuna islatzen zuen apetak. Edozein moduz, sentimenduak, emozioak, desioak eta gisako hitzak edo kontzeptuak aipatu ere ez ziren egiten etxe hartan.

Mutiko polittari beti irudi zitzaion kastitatea gordetzea ez zela bereziki zaila izango, azken finean haragiaren grinak asetzea bekatu zen edozein kristaurentzat —ezkonduentzat izan ezik, eta hura tentuz!—, beraz ez zuen aparteko meriturik, beste kristauei eskatzen zitzaien, hain justu, edo ez behintzat apaiz edo fraide izateagatik. Gainera artean haragia ez zitzaion oldartu eta Maribel ez zen inoiz arazo izan. Amabirjina zen aipatzen zen emakumezko bakarra, ama eta birjina aldi berean, eredu eta aterpe, Jesusengan iristeko bide, maitasunezko hitz samurrak zein pentsamendu hunkigarriak jaso zitzakeen emazte pribilegiatu eta bakarra. Bestalde nobizioaldian inork ez zuen kuttuntzat hartu, maixuak ez zizon atxikimendu berezirik erakutsi, eta alde hartatik so eginda bakean bizi izan zuen hamabost-hamasei urtealdia, kastitatea gordetzeko zina egitean zeri uko egin behar zitzaion argi samar antzemanda. Kastitatean bizitzeak ez ezkontzea zekarren, noski, baina zer zen hura Jainkoak berak hautatutako batentzat, hautatzearekin batera emazterik gabe irauteko gaitasuna, grazia, eman bazion.

Mutiko politta pentsamendu lizunekin borrokatzen zen. Guda itsuan borrokatu ere, pentsamenduak edukitzea eta haiei oniritzi ematea sarri antzeman ezinik, eta hori ez zen gertatzen errota hartan lizunkerietarako beta handirik zegoelako, baizik maizegi, ia obsesiboki, insistitzen zelako bekatu-klase hartan. Egin zitekeen bekatu bakarra zirudien, bekatu-bekatua, alegia. Hala, errotatik irten eta nonbaitera joateko —Opakua gainera, esate baterako— Agurain gurutzatu behar zenean —tropa osoa batuta, sotana beltza eta guzti— honako hau esaten zuen maixuak: ”Betaurrekoak dauzkazuenok kendu eta gorde patrikan herria atzean utzi arte; gainerakoak, begiak oinetakoetan josita ibili”. Etsaia alboetan egongo zen, beraz, eta harengan ezin ziren begiak pausatu, begietatik sartutakoak bihotzean itsasten baitziren, eta gero komeriak handik uxatzeko!

Pobreziari dagokionez, kastitatea bezain edo errazagoa zirudien. Etxea edonon —komentuz komentu bizi zitekeen munduari bira emanez—, jatekoa, jantziak, ikasketak, prestakuntza, etorkizuna eta lana, dena segurtatuta egonda, norberak dirurik ez eduki ez kudeatzea zen koska bakarra. Elkartearen ondasunak —uste baino txikiagoak, baina, nolanahi ere sobera arazorik ez izateko— kideenak ziren, diru-arduradun batek kudeatuko zituen, bakoitzari behar zuena banatuz, arrazoi berezirik ezean denak berdin bizi ahal izateko. Zerbait behar izanez gero, eskatu, eta kitto. Ardura bat gutxiago; gainera, zioten, "norberak berea utziz gero, baten truke ehun itzuliko dizkio Jainkoak, eta inor ez da premian biziko". Ez zirudien tratu txarra, are gutxiago jakinik ezen hilda gero zerua izango zela sari, betiko.

Obedientzia zen, beraz, erronkarik handiena; menekoa izatea, alegia. Jainkoari zor zitzaion obedientzia, baina zuzenean ezinezkoa zenez, haren ordezkarien —apaiz arduradunen edo nagusien— esanekoa izaten ikasi behar zen, arduradunei obeditzea, Jainkoari berari obeditzea zelakoan. Zalantzarik gabe. Galderak pausatu gabe. Hor ez zegoen arrakala posiblerik. Mendekoa zenak ez zuen hutsik egingo. Maitatzea obeditzea baitzen. Hartan bai komeriak, moteilak! Hartarako prestatu beharra zegoen, gogotik: ez omen zen gauza bera bidezko agindu bat betetzea edo apeta hutsean oinarritutakoa, eta asko ziren halakoak, hainbat aldiz apropos menekoaren prestutasuna frogatzeko aginduak kasurik onenean, eta orduan erraza zen errebelatzea, zergatiak eskatzen saiatzea edo gutxienez arrazoitzea; menekoaren kalterako, jakina, nola edo hala etorriko baitzitzaion buelta, adibidez iluntzeko konferentzian non, egunean edo astean egindako akatsak zeintzuk ziren adierazteko apalki eskatuz gero —horixe zen ohitura—, berehala ekingo zioten albo batetik edo bestetik "ez du gogoz edo isilik obeditu", eta ondorioz, zigor eredugarriren bat jarriko zitzaion.

Baldintza haietan batere edo ia batere zalapartarik gabe, patxada osoan, bizi zen gazte-koadrila. Mutiko polittak Agurainen siesta, biaoa, deskubritu zuen. Ez zuen harritu, izan ere erabat ezezaguna ere ez baitzen, baserrian den-denek —jendeak eta abereek— egiten baitzuten siesta egunero, bazkalostean. Nobizioaldian erritua zen siesta. Bazkalostean paseo txikia egin eta siestara joan ohi zen. Laburra zenez, ez zegoen erantzi beharrik. Sotana kendu eta ohazalaren azpian etzatearekin nahikoa zen. Oheak galeria luze batean lerratuta zeuden, hormatxo baten alde banatan, batzuk paretari begira, eta besteak leihoetara. Modestia gordetzeko, lizunkeriari aukerak ez ematearren —oheratzean auskalo zer ager zitekeen sotanen azpian— izara batzuk esekitzen ziren gakoetan, paretatik hormatxora oheak elkarren artean bereiziz eta logelari halako kanpamentu-itxura zabarra emanez. Izara haiek erretiratu egiten ziren gero, egunean zehar ganbara airosoago mantentzeko.

Inguruko herrixkak deskubritzea zuten zeregin gustukoena: Zuazo, Heredia, Dallo, Etura, Luzuriaga, Egilaz, Mezkia, Araia, Bikuña, Muniain, Gazeo, Ezkerekotxa, Opakua eta beste hainbat bi mendilerroen artean, Urbasaren eta Aizkorriren artean. Joan, gehienetan korrika edo oso arin iritsi, elizan bildu, elkarrekin otoitz txiki bat egin eta itzuli —sarri inorekin hitzik egin gabe—, hori izaten zen dena asteroko irteeretan, baina pozgarria eta atsegingarria suertatu ohi zen itxituran bizi ziren gazteentzat. Gorputza nekatzeko ez ezik arnasa hartzeko balio zuen eta denak irabazle aterako ziren; gazteak, indarberrituta, eta arduradunak gogotsu beren ardurapekoak hezten jarraitzeko.

Urte hartan izan zuten, ordea, beste bisita desatsegina. Heriok bere mutur beltza erakutsi zuen, beste behin; bigarren aldiz mutiko polittaren bizitza laburrean. Egun libre eskas haietako batean gertatu

zen. Gasteiz aldera abiatu zen gazte-aldra, hiribururaino ez iristeko aginduz, eta hala bi zutabetan banandu ziren, bat Dulantzirantz, bestea Gebaratarren gotorlekurantz. Azken horietako batzuk Santaengrazia pantanoraino heldu ziren. Gehienak nafarren gazteluko hondakinen inguruan geratu ziren bitartean, olgetan, beste batzuek, ordea, ezin izan zuten uretan bainua hartzeko aukera galdu nahi izan, eta zoritxarrez bertan geratu zen bat, barruko lohian trabatuta-edo. *Hermano* bat zen, lego izateko prestatzen ari zena, eta beste behin luze iraun zuen gazteen artean itota hildako kide baten galeragatiko erresumina. Sotanarik gabe zendu zela, desobedientzian harrapatu zuela Dama Beltzak, hantxe itxaroten zeukala Etsaia gazte gizajoak eta, beraz, argi ibiltzeko aurrerantzean, etab.; ez ziren falta izan gogoetak eta arrazoiketak esanekoak izaten jarraitzeko.

Eta hala, urte-bukaera iritsi zen, uztailaren hamaseia. Amabirjinaren eta Ordenaren sortze-eguna zenez, egunik egokiena aurrera egiteko nahia erakusteko eta, aldi berean, arduradunek onetsitako gazteek euren zinak egiteko. Mutiko polittak hamasei urte zituen aita German Ordenaren ordezkariaren aurrean, belauniko, haren eskuan eskua, hiru botoak betetzeko promesa ozenki adierazi zuenean. Zinak hiru urteko balioa zuen, gazteegiak baitziren mutiko haiek betiko hitza emanarazteko. Beraz, behin-behineko zina egiten zen, hiru urtetan norberaren gaitasuna, ahala eta borondatea neurtu ahal izateko; bihotzez, ordea, betiko irauteko gogo irmoa zeukaten.

Egun handia zen hura. Ordena osoa gazte ausart eta eskuzabal haien ezpainetatik esekita zegoen, kide berriak prestatzeagatik Jainkoari eskerrak emanez, eta aldi berean etorkizuna ziurtatzen zelako elkartearentzat. Bestalde, mutikoen familiek baimena zuten elizkizunean presente egoteko eta horrek ere beste hunkidura-motaz blaitzen zuen zinaren gertakaria. Inork gutxik huts egingo zuen egun hartan,

oro har familia kristauak baitziren denak. Han egon zen mutiko politaren familia: aita, ama, anai-arreba txikienak, poz-pozik mutikoak elizaren bidean urrats sendoa ematen zuelako, baina penatuta kristau zintzoak ziren arren, semea sakrifikatzea eskatzen zitzaielako. Amak besoetan hartu zuen semea zeremonia bukatu ondoren, hunkituta, orduan ez zion deus gehiago esan, baina aurrerago argitu zion orduko malko-isuriaren esanahia.

## *Kartzela-txokoan, beti erne (4)*

*Azken boladan asko irakurtzen ari naiz: Larrua hotz, La doctrina del shock, pare bat aipatzearren. Borrokan nabil nire buruarekin, denak ematen dit min; eta egoera honetan arantza bihurtzen zait edozer gauza. Agustinek oparitu dizkidan euskal kanturik ezin dut entzun, negar-malkotan hasi gabe. Benito Lertxundik niretzat idatzi duela dirudi: "Era aunitz dago / ni gatibu hartzeko / arma mota ugari / amore emateko / eta ukamena / denetan bortitzena". Elias Canettirenak dira hitz hauek: "Esan zeure-zeureak diren kontuak, esan / horiek dute benetan garrantzia. / Ez lotsatu. / Gainontzeko guztia arrunta da / egunkarietan ageri dena". Neure kontuak, neure hitza. Horretan nabil, amorratuta. Neure baitatik sortzen den ur zikina batzen, garbia bilatu arte. (...) Askatasuna dut bakarrik nire ondare, dena galdu ostean. "Dana emon biar jako matte dan askatasunari", idatzi zuen Lauaxetak fusilatua izan baino lehentxoago. Une honetan, ordea, aurpegi lizuna ikusten diot askatasunari, ez da maitagarri une honetan. (...)*

*Aspaldiko partez albiste on bat jaso dut: laugarren moduluko kideek opari hunkigarria eman didate. Gutun-azal batean postaltxoa, eskumuturreko dotorea eta anarkista baten testua. Badakite zer gertatzen ari zaidan, eta kontsolatu egin nahi naute. Dena pasatzen dela diote, gau-ilunean ere beti dagoela argitxoren bat, ikusi nahi izanez gero. Nire ikaslea izandako Itzik tarta bat bidali dit hamalaugarren moduluko nesken partez. Jokinek, berriz: "Zaindu hadi. Luzera begiratu". Hunkitu naute eta ostera malkoak isuri ditut. Hola izaten da kartzela, batzuetan ongi besteetan ez hainbeste. Siestatik esnatzean hauxe otu zait: "Zein ondo dagoen bat lo, baina bizi, iratzarrita bakarrik bizi daiteke". Zein urri eta eskasak diren (nire) hitzak sentimenduak adierazteko. Zein pobre eta xume lerrook barruko urradura eta oinazea aditzera emateko. Ez*

*dakit norbaitentzat edo noizbait baliagarri izango diren nire hitzak. Hementxe uzten ditut nire bizipenak islatzeko... Nik neuk ere ez ditut irakurri nahi. (...)*

*Mari etorri da. Nire hitzak dotore eta duin entzun ditu. Lau orduko bisita bukatu ondoren, "Txoria txori" kantatzeko eskatu dit, eta amaieran: "Hiltzen naizen egunean horixe kanta iezadazu". Emakume honen tamainak ez dauka neurririk.(...)*

*Egun tristea izan da gaurkoa. Urdailean korapiloa daukat. Malkoak agor. Moduluko kideek bisita-eguna izan dute beren maiteekin. Ni bakarrik geratu naiz. Arratsalde osoa irakurtzen eman dut. Orain ilunabarra da, eta futbola ipini dut telebistan, burua pixka bat egurasteko, edo bakardadea estaltzeko. Batzuetan zeinen ondo datorren opio pixka bat! (...) Nire ohituren kontra poema bat idatzi dut egunotan nire egoeraren aldrebesa nolabait kondentsatzeko:*

*Maite ditut maite*
*bizitza erabatekoak,*
*osoak, ezpaldurarik gabeak,*
*trinkoak;*
*Onartzen dut, aldiz,*
*neurea,*
*puskailez betea, hautsia, adabakiz josia,*
*nahi eta, ordea, ezindua,*
*abaildua,*
*eta, hala ere, tematua,*
*grinaz jasoa,*
*ahalez saiatua.*

*Nire biloba Ziharak Mari Domingi abestu dit telefonoz, oso-osorik buruz. Ze poza nirea! (...) Hotz egiten du. 0 gradupetik behera. Txanoarekin eta mendiko arroparekin oheratu naiz aspaldiko partez. (...) Pentsatu dut itzultzen hasiko naizela. Katalanari hartu diot buelta, eta "La plaça del diamant" itzuli nahi dut, probatzeko. Horrez gain ingelesa ikasten hasiko naiz George virginiarrarekin. Urte berri, asmo berri.*

*Urteari hasiera emateko; Joxe Azurmendiren azken obra irakurtzen nabil: Azken orduak Gandiagarekin. Liburu joria inondik ere, eta aberatsa edozein alderditik begiratuta.*

# -V-

Aguraingo proba-urtea arrakastaz burututa, Santo Domingo de la Calzada izan zen hurrengo helmuga apaiz klaretar bihurtzeko bidean. Mutiko polittarentat zortzigarren etxebizitza izango zen, gehiegitxo sustraiak inon errotzeko.

Hiru zinei esker behin-behinekoz fraide eginik, ostera ikasketei heltzeko garaia zen. Hurrengo lau urteetan *filosofo* bilakatuko ziren gazte inozo eta idealista haiek. Izan ere ikastetxe berrian batik bat filosofia ikasten baitzen; hala-moduzko filosofia beherago azalduko denez, baina filosofia, meza eman aurretiko azken txanpan teologiako ur handitan murgildu baino lehen. Garai hartako apaiz-ikasketen arabera, batxilergoko bosgarren ikasturtea amaiturik, eta behin nobizioaldia garaituta, filosofiaren unibertsoan abiatu beharra zegoen oso ikasketa-plangintza zorrotzari jarraituz. Lau urte haietako lehenengo biak humanitateak ziren filosofia baino gehiago. Hartara latina —Horazio, Virgilio, Tito Livio, Ovidio, Ciceron itzultzen ziren aise—, greziera —Homero, Eskilo, Sofokles, Euripides—, literatura —espainol unibertsala, euskarazkorik ez—, natur zientziak, biologiaren, psikologiaren eta pedagogiaren hastapenak, ingelesa eta antzeko gaiek ordu asko hartzen zuten urteko programazioan. Nolanahi ere lehen egunetik abiatzen ziren gazteak filosofiaren alor malkartsuan barrena, pentsa, pentsamenduaren lore eta fruituen bila. Zorionez zenbaki-konturik ez zen plangintza hartan, eta mutiko polittak lasai ekin zion zeregin nagusiari, ikasketari alegia, gustukoa baitzuen liburuetan nabigatzea begiak zabal-zabalik.

Ikastetxea herrigunean zegoen, alde banatan errepidea edo kalea zuela, etxebizitzetatik gertu-gertu, ez ordea etxalde eta baratze osoaren ingurua hormaz itxi gabe. Eraikin zahar samarra zen, xumea, funtzionala eta, ohi bezala, bi komunitate biltzen zituen, gazte ikasleena eta apaiz zein lego helduena, bata zein bestea autonomia erlatiboan, bien arteko hainbat sinergia bat eginik, noski: sukaldea, jantokia, garbitokiak, soroak, administrazioa eta arauak, denenartean hezkuntza-elkartea osatuz. Irakasleak bertakoak ziren, denak apaizak, filosofia eta humanitateetan adituak gutxi-asko, batzuk oso-oso trebeak eta ongi prestatuak, eta beste batzuk, edonon bezala, kaskarrak edo txarrak. Lan-giroa, ordea, izugarria zen, erritmo bizi-bizikoa, intentsitate handikoa. Aita arduraduna, *prefektua*, apaiz zumaiar gaztea, pedagogian lizentziatua zen, unibertsitate zibilean ikasia, beraz garaiko zantzuetara ondo egokitua, gazte-koadrila hezkuntza sendoan, eta modernoan, bideratzeko aproposa printzipioz. Euskaraz bazekien arren, ez zuen euskaraz egiten, soilik gaztelania zerabilen, hizkuntza bakarra, unibertsala, denona: beraz, bertan ikasten zuten ikasle euskaldun eskasek —pare bat baino ez, bestalde— euren golkorako gordetzea zeukaten euskara, guztien onerako. Mutiko politta Euskal Herritik gero eta urrunago bizi zen, fraide izateko bidean, eta modu naturalean —arrazoitu gabe, alegia— hartzen zuen erbesteratze eta deserrotze sistematiko hura, Jainkoa ez zegoen txikikerietarako, eta Jesus Nazarethekoaren jarraipenak ez zuen euskara ezertarako behar. Ez zen debekurik euskararentzat, adeitasunik ere ez, ordea, artaldea sakabanatzeko dohaina zuelakoan, eta ondorioz ez zen ezertarako erabiltzen —mutiko politták ere ez, etxekoen bisita-egunetan izan ezik, urtean behin edo bitan, alegia—.

Hirurogeigarren hamarkadako filosofia *ancilla theologiae* zen oraindik —teologiaren mirabe eta jopu, alegia—, eta beraz ez zen diziplina autonomoa, haren argitan kristaututako hibridoa baizik. Ikasgaiak

askotarikoak izan arren —Logika, Ontologia, Teodizea, Kosmologia, Historia, etab.— entziklopedia moduko liburuki bakar batean ikasi ohi zen dena. Gredt beneditarra zen haren autorea, eta katixima gisara antolatuta zegoen —galdera eta erantzunez—, belaunaldiz belaunaldi filosofo gazteen eskutik eskura oinordekotzan pasatzen zen liburukote horizta, koipeztua. Bi zutabe zituen liburu mardul hark: Aristoteles eta San Tomas Akinokoa, haren bertsio kristautua. Aristotelesen aurreko filosofia osoa —Sokrates, Platon, Pitagoras, Heraklito, etab.— haren aurrekari hutsa zen, eta ondorengoa —Descartes, Leibnitz, Hegel, Shopenhauer, Kant eta enparauak— San Tomas filosofo-teologoaren argitara interpretatzen zen. Ez zen ia inoiz testu filosofikorik zuzenean aztertzen, autoreak patxadaz arakatuz. Gredtek azaltzen zituen autore haiek denek idatzi zutena, eta salbuespenik gabe ezeztatzen zuen den-denen argumentazioa, Aristoteles eta San Tomasen ubidera eramanez. Beraz, bi haiek izan ezik bazterrean geratzen ziren filosofo guztiak, gutxi-asko desbideratuta zebiltzalako. Nekez irits zitekeen autore bakoitzaren mamira, beneditar alemanaren bahetik pasatzen zena asimilatu besterik ez zegoen filosofiaz eta filosofoen pentsamenduaz jabetzeko.

Mutiko politta kateatuta ibiltzen zen sustantzia, esentzia, existentzia, potentzia eta gisako kontzeptu lehorren artean, baina memoria ona zeukanez txukun moldatzen zen eta normalean egoki erantzuten zien irakasleen galdera aldrebesei. Filosofia-urte haietan liburu bakarra irakurri zuen testutik at, Sören Kierkegaarden *Temor y Temblor* gaztelaniaz, eta inpresio desatsegina utzi zion barruan, baina koherentzia absurdoaren eta fundamentalistaren hazia utzi zion ereinda, edo auskalo, beharbada hobeto esateko, bere sentiberatasun minbera Ipar Europako pentsalari tormentatuaren barne-oinaze bortitzarekin identifikatu zuen. Geroago azaldu zioten Unamuno haren ezpal berberekoa zela neurri handi batean. Irakasle gutxi batzuk ikasgaiak

latinez ematen zituzten oraindik, eta jakina, txiki-txikitatik latina lantzen ibili ziren arren, besterik zen lezioak latinez ematea, diskurtso filosofikoari jarraituz. Mutiko polittak ez zuen zaletasun berezirik erakutsi arlo hartan, edozein moduz, espedientea bete behar zenez, bete egin zuen, eta kitto. Gelako kalifikazio onenetarikoa ateratzen jarraitzen zuen, aurreko urteetan bezalatsu. Hizkuntza klasikoen ospea gainbehera zetorren gainera Kontziliondoko garai haietan.

Eskolaz kanpoko ekintzetan eta ariketetan hartzen zuen atseginik gozoena mutiko polittak, berriro. Kalifikazio onak ateratzen zituztenek beste zerbait, adibidez ikasketa osagarriren bat, probatzeko baimena izaten zuten, eta hala frantsesa ikasteari ekin zion. Agian ingelesa indartzea izango zen logikoena, baina frantsesa batxilergokotik landuta zekarrenez, hari heldu zion gogotsu. Astean bizpahiru aldiz, ikasgela nagusia utzi eta gela txikiago batera joateko ohitura hartu zuen, non *Geloso* magnetofoi batean, zinta bidez, *Assimil* metodoa ikasten jardun zuen. Artean gaztetxo izanik esnezalearen kontuak osatzen hasi zen bere baitan: filosofia bukatzerakoan menderatuta edukiko dut frantsesa, beraz teologian ingelesari heltzeko unea iritsiko da, eta hala, auskalo zer gehiago gerora. Ederra zen hizkuntzak ikastea, are gehiago hartarako zeukan erraztasunarekin. Euskara, beno euskaraz mintzatzen bazekien, etxekoekin erraz moldatzen zen, eta ez zitzaion iruditzen beste ezer behar zenik, ohartu gabe higatzen ari zitzaion mintzairari eusteko. Bestalde pentsaezina zen euskara ikasten ahalegintzea, susmo txarrez hartuko zen asmoa.

Literaturako irakasleek eraginda *antzerki irakurria* egiten zen, alegia, autore ezagun baten obra hartu eta antzeztu ordez irakurri egiten zuten, aktoreena jokatzeko hautatuek jendaurrean arituz. Ongi irakurtzen jakin behar zen, dramatismo-sena bereziz jokatuz, egoki intonatuz, ozen, argi, obra bakoitzari zegokion moldean eta sintonian. Mutiko politta beti egoten zen aukeratuen artean, eta oso-oso

gustura betetzen zuen zeregina. Hala deskubritu zituen hainbeste autore, hala nola Alfonso Sastre (*Escuadra hacia la muerte*), Antonio Buero Vallejo (*Historia de una escalera*), Alejandro Casona (*La dama del alba*), Samuel Beckett (*Esperando a Godot*), eta beta paregabea izan zuen literatura sakontzeko.

Askotan paseo-egunak aprobetxatuz adibidez, gainerako kideak jolasean jarduten zuten bitartean, bera galsoro batean edo sasitzan ezkutatuz sotanapean ateratako liburu bat edo beste irakurtzeko erabiltzen zituen ordu libre haiek. Halaxe irakurri zituen *Iliada*, *Eneida* eta Greziako antzerki klasiko ia guztiak. Erdi ezkutuan edo erabat ostenduta irakurritako testu haiek asko zuten abentura debekatutik, beste mundu batzuetara ihes egiteko posibilitatea doan eskaintzen baitzuten, inori kontuak emateko premiarik gabe. Jainko-jainkosen eta heroien arteko harremanak, jolas erotiko eta grina odoltsuek lilura txundigarria zeukaten mutiko polittaren irudimenean. Sarri pentsatzen zuen bekatu egiten ari ote zen irudimenaren ateak giza grinei irekiz, baina kultur goseak dena zilegiztatzen zuen.

Mutiko haiek jada koxkortuta gaztaroan ondo abiatuta adinari zegokionez, irratia entzuteko baimena lortu zuten, jolastorduetan. Tresna haren bitartez deskubritu zuen urte haietan kalean pil-pilean zebilen musika-zaletasun ikaragarria, baitik bat The Beatles taldearen arrakasta. Liverpooleko *marigorringoen* zale itsu bihurtu zen mutiko politta, *prefektua* kezkatzeraiano zaletu ere. Izan ere George, Ringo, Paul eta John bezala orrazten hasi baitzen, hargatik behin baino gehiagotan ohartarazia izan zelarik. Alferrik, errebelde samar azaltzen hasi zen ordura arte txintxo-txintxo zebilen gaztea.

Patioaren albo batera zegoen egongelatxoan YA egunkaria irakurtzen zuten, gazteen eskura, ikastetxearen hesietatik harago mundu zabalean gertatzen zena ikusteko paperezko leiho. Urte haietan go-

goangarria izan zen Israelek herrialde arabiarrei Sei Eguneko gerran emandako jipoia, eta guda hartako heroien artean Mose Dayan ministro begibakarra gailentzen zen guztien artetik. Israeldarrak Jainkoaren herri ziren, Jesus Nazarethekoaren herrikide; arabiarrak, berriz, paganoak —filisteoak, jebuseoak, madianitak, eta beste anitz—, urrunetik etorriak herri aukeratuari, Jainko-herriari, gaiztoki eraso egitera; beraz izugarri poztekoa zen juduen balentria, Sinai penintsulak eta Golaneko Gainak jabetzean erakutsitako gaitasuna. Azken finean, eta antzina agindu bezala, eurekin zegoen *Yahvé*.

Oso gustura irakurtzen zuten baita ere Erromatik idatzitako kronikak, Vatikano II. Kontzilioa zela-eta, Eliza Katolikoa aldatzen, modernizatzen, betiko zurruntasuna galtzen —*aggiornatzen!*— ari zen seinale. Aldaketa batzuk berehala sartu ziren komentuan, batik bat liturgiari zegozkionak —apaizak jendeari begira ematen zuen meza aldarean, latina alboratuta gaztelaniaz egiten zuten otoitz eta kantu, etab.—; sotanaren ezinbestekotasuna arrailtzen hasi zen, gazte batzuen artean eztabaida sutsuak sortuz. Han-hemenka fraide batzuek, abitua utzi eta *clergyman*a jantzi zuten, sarri esamesa gaiztoei aurre eginez. Oro har sesio handirik gabe onartu zituzten gazteek aldaketa haiek denak, mutiko polittak poz-pozik. Telebista ere bazuten, haren erabilpena *prefektuaren* araberakoa izaten zen, ordea, eta zorrotz kudeatzen zuen ahalmen hura. Hiru programa ikusten zituzten gazteek: *El Dia del Señor* igandeetako bazkalondoan, Alfredo Amestoy kazetariaren kronika sozio-kulturalak, eta antzerki-saio bat astean behin lanegunetan, *Estudio 1* zeritzana. Urtean behin, *Eurovisión*. Gazteek gehiago ikusiko zuten, komentuko leihoetatik kanpora zer ote zegoen kuriositatez, baina, edozein moduz, konforme zeuden antzerki-saio hura ikusi ahal izanda. Hura ez ikustea zen, beraz, jaso zitekeen zigorrik larriena, aldika aplikatzen zuena *prefektuak*, norbanaka edo modu kolektiboan. Halakoetan triste geratzen ziren gaz-

teak aste hartako antzerkia ikusterik izan ez zutelako, bikain-bikaina irizten baitzioten denek programa gogoangarri hari.

## Kazetari izan ote zitekeen

Bestalde, Parisen bizi zen osaba fraide legoak *Paris Match* bidaltzen zion hilero eta, seguru aski frantsesa ikasten ari zelako, hura edukitzeko baimena ematen ziotenez, seminariotik kanpo bizitzarik bazegoela ohartu zen argiki. Horrela enteratu zen Parisen jendea oldartuta zebilela, 68ko maiatzaren berri izan zuen. Aurkikuntza hark ez zuen mutiko politta bere bidetik ateratzeko ahalmenik izan, baina zalantzarik gabe, bere gogoa berpizteko eta batik bat berak ere zerbait egiteko asmoa erne zion. Aldizkari bat sortu zuen, *Panorama*. Erabat artesanala zen, esku-lan hutsa. Ale bakarra egiten zen, seminarioan ez baitzegoen kopiak ateratzeko tresnarik, are gutxiago inprentarik. Beraz, kartulinazko azal beltzak jarrita banatzen zituen dozena bat orri-pare zuri, idazmakinaz idatzi eta han-hemenkako argazki-ebakinez hornituta. Hilerokoa zen arren, lan handia ematen zion, ia berak bakarrik osatzen baitzuen den-dena jolastorduei pila bat tarte ebatsiz. Behin baino gehiagotan atera behar izan zuten lehen solairuko koadernazio-gelatik, pittin bat egurats zedin, eta gutxienez korrikaldi batzuk egin zitzan ikastera igo aurretik.

Uda-garaian etxera joaten ez zirenez, ikastaro bat prestatu zuten apaizek Santo Domingon bertan opor-denbora nolabait aprobetxatzeko, ohiko asignatura filosofikoak alboratu eta zerbait arinagorekin saiatuz. Uda batez Aita Sarmiento apaiz klaretarra ekarri zuten Sevillatik, gazte haiei ikastaroa ematera, zertaz eta Kazetaritzaz, bera ere itxuraz apaiza ez ezik kazetaria baitzen, Andaluziako hainbat he-

dabidetan lan egiten zuelarik. Oso atsegina izan zen ikastaroa, berria, erakargarria, ikuspegi-zabalgarria. Ikastaroari amaiera emateko lan bat agindu zien gazteei, ikastaroari berari buruzko erreportajea. Denetan lanik onena mutiko polittak egindakoa suertatu zen eta saria Burgosera bisita, lehiaketan bigarren geratu zenarekin. Lehenengoa izateagatik, berriz, liburu bat oparitu zioten, Luka Brajnovich-en *Tecnología de la Información*, garai hartan sonatua. Hura poza mutiko polittarena! Panorama aldizkariaren zuzendari ez ezik benetan kazetari izan zitekeen sari hark baieztatzen zuenez, eta gerora —apaiz bihurturik— agian kazetaritza-ikasketak egin zitzakeen, eta hala, egokiago azalduko zien kristau-mezua belaunaldi modernoei. Burgos bisitatzean ikusi zuen lehen aldiz kartusiar bat, Mirafloreseko Kartusian, ume-umetatik izan nahi zuen fraide-taldekoa!

Bisita alfer-lana izan ez zedin bidaiari buruzko beste erreportaje bat idaztea eskatu zion *prefektuak*, eta bueltan, denen aurrean irakurri zuen, iluntzeko hitzorduan, Burgosen hartutako oharrez atondutako testua, atseginez eta harrotasun handiz. Ez zen gaizki moldatu, egiatan. Benetan burgoi sentitu zen egun hartan, beraz oso posible zen bide hura urratzea. Mutiko polittaren imajinarioan apaiz kazetariaren irudia zertzen hasi zen. Gainera ondo egokitzen zen zeregin hura Claret fundatzailearen jokabidearekin. Zioten oso *propagandista* ospetsua izan zela, zientoka idatzi zituela orri solteak jendea ebanjelizatzeko, sermoiei baino hagitzez eraginkorrago irizten ziela berak orritxo haiei, kazetari kontsideratu zitekeela; oso tipo pedagogikoa izan zela Ordenaren sortzailea, hitzez eta idatziz ederki moldatzen zelarik, baina joera berezia zeukala jendearengana idatziz hurbiltzeko. Ordenak bazituen aldizkari batzuk, hala nola *Iris de Paz* Madrilen, eta urte haietan sekulako aldaketa eman zioten apaiz gazte batzuek, Pere Casaldàliga izeneko katalan bat buru zuen talde ausartekoek. Harrez geroztik zinemaz, antzerkiaz, literaturaz, ideologiaz, gazte-

riaz eta beste hainbat gai ez erlijiosoz irakurtzerik bazegoen aldizkari propio batean, askoren eskandaluz eta ikasle gazteen txaloz. Bere burua alor hartan egoki barrundatzen hasi zen mutiko politta, erlijio-kontuak zertxobait egurats zitezkeela oharturik-edo.

Etxebarruan egiten zen bizitza, inora irten gabe, katedralera kantatzera edo herriko prozesioetara —Gorpuzti Egunean eta Gabonetan— izan ezik. Halakoetan sotana beltzaren gainean errokete zuria zeramaten jantzita eta, beraz, apaiztxoak zirudite n. Mutiko polittak abesbatzako bakarlaria izaten jarraitzen zuenez, zeregin berezia izan zuen *kaleko* zeremonia erlijiosoetan, bihotza harrotasunez beteta bizitzen zuelarik, noski, norbait bazelakoan-edo. Abesbatzakoa izanik, ohiko kantuera erlijiosoa ez ezik gregorianoan trebatu zen eta trebezia hari esker, behin Balbuenako Amabirjinaren basilikara joateko parada izan zuen, autobusez. Bi eginkizun zeuden egun hartan beneditarren monasterioan: Zaindariaren festako meza nagusian abestu eta, ondoren, Amabirjinaren Kofradiako Zaldunei janaria zerbitzatzea. Bigarren egiteko hura zen bitxiena eta ezohikoena. Monasterioko jantoki luzean fraide abitudunak eta Zaldun kapa zuri-urdindunak jesartzen ziren lerroz lerro, eta mutikoak sukaldetik mahietara aritzen ziren presaka jaki eta edariak eraman eta ekarriz. Joan-etorri lurruntsu haietan mokadu bat kendu, tragoxka bat irentsi jardun zuten bizpahiru orduz. Bukaerarako zorabioaren zantzu mingarriak sentitu zituen mutiko polittak, burua biraka eta joanda; mihia, berriz, lotsagabeki aske, edozer esateko trabarik gabe. Auskalo zer esan eta egin zuen. Kontua da autobusez seminariora bidean agiraka egin ziola *prefektuak*, eta oheratu aurreko otoitz-saioan kaperatik bota behar izan zuela atzeko bankuan purrustadaka ari zelako. Inori ezer galdetu gabe oheratu egin zen mutiko politta, eta hurrengo egunean, eguerdi aldera iratzarririk —taldea goizean goiz altxatu zenean ez zen esnatu—, ez zen ezertaz gogoratzen, adiskide bat

gogotik saiatu zen arren gertatutakoa freskatzen. Alferrik. Atxurra zer zen bazekien.

Inguruko herriak eta bazterrak ezagutzeko erabili ohi zituzten paseo-egunak: Ezkarai alderantz, Santurde, Santurdejo, Gallinero, Pazuengos, Ojacastro, inoiz San Lorenzo gaina ukitzeraino; Haro alderantz, Casalarreina zuzenean eta buelta, beti korrika, garaiz iristeko; Naiara alderantz, berriz, Bañares, Zaraton eta Hervias gainditu eta hango arteagan ezkurrak egosiz edo mahastietan mahats-mordoak eta almendrak batuz. Egun osoko irteera-egun batean Beloradoraino heldu zen mutiko politta, kide baten ama bisitatu, bertan lukainka otartean jan eta ostera etxera, txintxo-plantak eginez. Oporretan ikastaroren bat antolatu ezean, Balmasedara edo Castrora eramaten zituzten hango seminarista gazteagoen hutsunea betez eta urte batzuk lehenago bizi izandako bizikizunak berriztatzeko. Enkarterrietan Kolitza mendi-tontor mitikoa ukitu zuten, eta egun beroetan Kadagoaren ur-bazter batean bainatzen ziren. Mutiko polittak beti zeraman libururen bat, Hugo Wast batik bat —Gustavo Alfonso Martínez Zuviria argentinarra—, tropatik aldendu eta gainerakoak plisti-plasta ibiltzen ziren bitartean mundu imajinarioan hegan egiteko..., edo atsedenaldietan, bertako gurbitz gozoak probatzeko. Castron, jakina, hondartzara joan ohi ziren goiz-goizetik ekandu onen jarraibidean, jendea hurbiltzen hasi baino lehen, eta arratsaldeetan Aita Sanmartinek eraikitako monumenturaino edo Pico Leoneraino.

## Estu eta larri

Hamazortzi-hogei urte zituen arren apenas kezkatzen zuen sexugrinak, haragia doi-doi iratzarririk; pentsakizunak, aldiz, eroturik zebilzkion xaxaka, zena eta ez zena inarrosiz. Jakin-mina eta kuriositatea aseezin bihurtu zitzaizkion, eta egun batean bai bestean ere bai erantzun eske joaten zen prefektuarengana, handik halamoduzko erantzunak jasota irteten zelarik beste galdera batzuk astinduta, errotarri zoroan. Kokoteraino egongo zen apaiza mutikoaren txorakeriekin —batzuk lotsagarri samarrak—, hala ere inoiz ez zion ezer ukatu, ahal zuen moduan, pazientzia handiz atendituz. Era horretan *eskrupuluak* zeritzan gaitza deskubritu zuen mutiko polittak bere baitan, alegia espirituaren estutasun konpultsiboa, aldika larrimin eta itolarri bihurtzen zena, bekatuaren armiarma-sarean ergelki harrapatuta sentitzeraino, beti infernuaren ahutzetan ahokaturik. Gaitz hark ez zuen atsedenik ematen eta beti erne mantentzen zuen gaixo, galderak galderei uztartuz. Zelako oinaze bortitza! Errealitatea lausotzen zuen, arazoak perspektibaz ikusteko gaitasuna kenduz. Hautsez betetzen zuen begirada, txikikeria ñimiñoetan korapilatuta. Ez zegoen bereizterik bekatu txikiaren eta handiaren artean. Dena zen handia, eta kitto. Bekatua beti zen mortala, larri-larria, hil ala bizikoa. Arnasarik gabe uzten zuen bularra, zabaltasunik gabe sena, irteerarik gabe jorana.

Perfekzioaren atea jotzea zen mutiko haien xedea: sexuarekin eta bekatuarekin ez ezik perfekzioa ukitzearekin zuen zerikusia gaitz hark. Erdibidean ibiltzea, erdipurdi jokatzea gaizki ikusita zegoen seminarioan, garai hartako espiritualitatearen ezaugarria zen epelak ez izatea, Jainkoak gehien gorrotatzen zuen akatsa baitzen epeltasuna, behin eta berriro errepikatzen zen Jainkoak hagitzez nahiago zuela hotza zein beroa, epeltasunak gomitolarria eragiten ziola, eta on-

dorioz, ezin zituela epelak jasan, ahotik botatzeraino; sutara, noski. Perfekzio bidean, beraz, ez zegoen tokirik salbuespenentzako; dena zen larria, txarra, higuingarria. Berehala ohartu zenez, bazegoen gaitz hark jotako jende nagusia ere, ez zen gazte esperientzia gabekoaren ezaugarri soila. Auskalo bakoitzari zer zamak makurrarazten zion bizkarra, baina bazeuden oinaze abailgarri haren aztarna harrigarriak. Adibidez apaiz batzuk erabat trabatuta geratzen ziren, meza garaian, sagaratze-hitzak esatean, misterio izugarria eraman ezinik, eta totelka hasten ziren, "*hoc est corpus meum*" ahoskatzean, erabat kontzentratuta ez zirelako, ezohartuki esaten zituztelako hitz miresgarriak, laburra izan arren hitz-kate osoa segidan esatea lortzen ez zutela. Behin eta berriro saiatzen ziren, urduri, larruko asaldura elkarte osora transmitituz, apaiz gaixoaren estutasunak estututa. Beste batzuk kalizak eta patenak ez ezik, eskuak eta ezpainak errukirik gabe igurzten zituzten Jainkoaren odolaren eta haragiaren arrastoak ezabatzeko ahalegin durduzagarrian, haren kontaktuak utzitako markak desagerrarazteko grinak desorekatuta.

Urte haietan ulertu zuen, umetan, meza-mutil zenean, lehen aldiz ezagututako gaitz hura; izan ere jaioterriko fraideen elizan bazen apaiz euskaldun ihar-ihar bat halaxe jarduten zuena jendaurrean —artean hormari begira ematen ziren mezak— sagaratze-unean, ogizatia eta ardo-parrastadatxoa Jainkoaren haragi eta odol bihurtuko zituzten hitz zehatzak, behin eta berriro, atzera eta aurrera, esaten saiatuz, ahoko hagin bakanak, luzeak eta horiztak, elkarren kontra karraskatuz. Arrankatu orduko geratzen zen ataskatuta gaixoa, ekin eta ekin, bukatu ezinik aztoraturik. Zahartzaroaren zantzutzat zeukatena erro sakonak zituen gaitza zen, oinaze mingarria eragiten zuena, eta mutiko polittak, gaztetuta, bere baitan sentitu zuen berbera; ez preseski sagaratze-hitzekin, ez baitzuen meza eman behar, baina bai bere baitako korapiloak askatzeko orduan. Orobat lana pilatzen

hasi zitzaion mutiko polittari Jesus Nazarethekoaren jarraibidean: Agurainen ikasitakoari —norberak bere burua ukatu eta Beste Baten borondateari begira ibiltzeari, alegia— estu eta zorrotz jarraitzeko angustia kontrolik gabea.

## Politikaren mutur itsusia

Seminarioan ez zen politikaz hitz egiten, batasun-urragarri omen zelako. Urte haietan, ordea, –60. hamarkadako bigarren zatia zen–zabaltzen hasi zen ordura arteko Kantabria eliz probintziako klaretar euskaldunek erkidego euskalduna eratu nahi zutela. Nahiko modu klandestinoan, misterioz gandututa, iritsi zen gaia seminaristen belarrietara. Haiengana iritsi zenerako aspalditik ibiliko zen bolo-bolo noski. Zeharka bada ere, ezkutu antzean, Euskadi eta euskaldunei buruzko liburu batzuk azaldu ziren mutiko polittaren inguruan, ez bere eskuetan baina bai ikaskide batzuenetan. Gauza handirik ez zen, Argentinako Ekin argitaletxeak ateratako ale bakan batzuk ziren, Irujo jeltzalearenak batik bat, eta Oteizaren *Quosque Tandem* misterioz lanbrotua. Antzeman izan zuenez makina bat bilera, harreman eta paper-trukea zebilen bazterretan, bertako eta kanpoko zenbait apaiz eta seminaristen artean, gaia egun argitara azaldu baino lehen. Vatikano II.ak irekitako ildoari jarraituz —tokian tokiko eliza aipatzen zen— hainbat klaretar euskaldun euskara eta euskararen eremua lantzen hasi eta erkidego berria sortzeko kaptazio-zereginetan ari ziren, han-hemenka komentuz komentu. Mutiko polittak zuzenean ezagutu ez zituen hainbat kide zegoen tartean, su ta gar ekinean: talde arratiarra batik bat, Salamancako teologia-ikastetxetik etorritako apaiz gazte batzuk, etab. Esaten zuten Salamancako azken belaunaldi euskaldunek soka luze bat eten zutela Euskal Herrira

itzuli aurretik; alegia ohitura omen zegoen, apaiz berri euskaldunak sistematikoki misio-lurraldeetara bidaltzekoa, eta hala, urrunean euskal hiztun-mordoa lanean kanpoan ari zen bitartean, Euskal Herria kastellano hutsez betetzen zen. Soka hura gerra zibiletik geroztik tenkatu omen zen, gazte ausart haiek "nirekin ez kontatu" esan zuten arte.

Osaba apaiza sortzez euskalduna zen, seminarioko apaiz begirale zumaiarra ere bai, baina, itxuraz, haiek ez ziren operazio haren aldeko, gehiago estimatzen omen zuten denen arteko hautsezin unibertsala bereizketak baino, eta ez zuten inola ere parte hartu nahi izaten taldea goitik behera urratuko zuen ekimen hartan; ez aldeko lanetan, esan nahi baita. *Euskal Herria* ipini nahi zioten izen erkidego berriari, *Cantabri*a zaharra zatitu eta egitura berria onartzen ez zutenak *Castilla* izenekora pasaraziz. Erroman ados egongo ziren, gerora ikusi zenez. Mutiko polittak ez zuen zuzenean parte hartu saltsa hartan. Batzuek zein bestek iskin egiten zioten gai hartan: euskaldunek, *osabaren iloba* zelarik arriskutsuegia suerta zitekeelako hari operazioaren sekretuak aitortzea, kontrarioen belarrietara iritsiko zirelako osaba-iloben bidez; erdaldunek, berriz, mutiko politta seminarioko euskaldunena zelako, eta alde hartatik bederen susmagarri garbia, eta beraz ezin izan zitekeelako apusturik onena. Hartara, inork ez zion zehatz-mehatz azaltzen, osabak ere ez, kontuak zertan ziren, nola jokatu eta zeintzuk ziren abantailak edo kalteak. Bere kabuz erabaki behar izan zuen euskaldunen aldera lerratzea, osabarena zapuztuz. Ez zen samurra izan, inondik ere.

Filosofiako hirugarren edo laugarren urtea izango zen, amona Eleuteria hil zenean, aitaren eta osabaren ama. Mutikoak ez zuen etxera joateko eskea egin —egin zitekeenik ere ez zekien—, baina bere harridurarako apaiz bat, Aita Ismael, etorri zen etxera laguntzeko

prest. Aukera ona zen eta hala jakinarazi zion *prefektuak*, prest egoteko eta harrera-gelara jaisteko sotana berria jantzita, aita Ismaelek nagusiarekin irteteko baimena negoziatu bitartean. Oso luze joan ziren orduak, pare bat bai. Alabaina itxaronaldia baino askozaz astunagoa izan zen erantzuna: "Baimenik ez dago, hileta-elizkizunera joan gabe geratu beharko zara". Arrazoi garbirik ez zioten eman. Baimenik ez zegoela besterik ez. Etxeko nagusiak —Agurainen zinak hartu zizkion aita German berberak— ez zuela egoki ikusten. Aita Ismael Euskal Herriaren alde zegoenetako bat zen, itxuraz; nagusia, berriz, aurkakoa. Mendekua izan ote zen irudimena geratu zitzaion mutiko polittari, fraideen artean halako jokaldi zikina nola gerta zitekeen ulertu ez zuen arren. Politikaren lehen harramazkak.

Nolanahi ere den, aitzindari-lanetan ibili ez zenez inork ez zion kontu zorrotzik eskatu mutiko polittari, eta beraz, ez zuen inoren herrarik merezi izan, operazioaren nukleoan gauzak gori-gori egongo ziren arren. Orduantxe entzun zuen lehen aldiz berak hautatutako aldea (euskaldunena) separatisten aldea zela, beti zatiketa- eta sesiobila ibilitako jendez osatua, elkarteari porrota besterik ekarriko ez ziona, zatiketaz gain, ospetsuenak *Castillan* kokatuko baitziren. Osabak, aldiz, erdibidea hartu zuen, *Leon-Galiciako* eliz probintzia osatu berrira joanda: ez Euskal Herrira, ez Gaztelara. Zinez min handia ematen zion hark denak barru-barruan berak ez baitzuen ezelango urradura ez inoren etena bilatu. Puska batean denek seminario berean jarraitu zuten. Mutiko politta ez zen betiko kideengandik urrun sentitu. Hurrengo urtean atzerriko bidea hartu zuen ikasketekin jarraitzeko, eta beraz, urrun samarretik bizi izan zituen Euskal Herria —hegoko lau probintziak osatua— zeritzan eliz erkidego sortu berriaren gorabeherak.

## *Kartzela-txokoan, beti erne (5)*

*Ezin dut bakerik Azurmendiren hitz batzuk hona aldatu gabe, nire egungo nabigazioaz eta gogoeta-gaiz ari baita bete-betean:*

*"Erlijioak behin barnean eduki izan duenarentzat, askatasuna ez da erraza (errazagoa da menpekotasun zahar otzana edo zapuzkeria berri garratza); askatasuna buelta handi bat da. (...) Itzuli eta hizkerarik gabe gelditu, esango nuke: inoiz habitatu zuen hizkeraren edo mitoaren puskailen artean, orain oroipena habitatzen ditu. Interesik handiena du mitoetan, maite ditu (ez daki, sinesten ez ote duen ere), konfiantza du, eta mesfidantzarik handiena. Alternatibarik ez dauka eta ez du uste dagoenik. (...) Batzuek etxe zaharra hustu eta emigratu egin zuten, kitto: etxe berria egin-egina aurkitu zuten, eta etxe batetik bestera, berak beti etxean egon dira (komunitate edo hobe, Alderdiren batean). Inoiz ez dute ezer jakingura izan utzi zuten etxe zaharraz. Niretzat hori ez da odisea bat. Odisea da etxea utzi, galduta ibili eta, batek ez daki nola, atzera Itakara itzulia aurkitzea. Bitartean, jakina, oso posible da Itaka hori arras aldatua agertzea; edo Odiseo bera egotea aldatua beretarrentzat era kasik ezagutuezina izateraino, zakurren batzuentzat-edo ez bada; edo berak Itaka uste duen hori batere ez izatea Itaka, oraindik feaziarren baten uharteren bat gehiago baizik. Odisea ez da korronteak eta zorteak eraman zaitzaten uztea. Naufragioa da, borroka, desesperazioa, autoengainua, gozo uharteko gozotasunaren limuria, meditazioa, ihesa zeure buruari eta gustuei, 'jainkoren baten' laguntza; azken finean, herrestan zaramatzan historia korapilatsu hori, antzaldatzen zaituena. Odisea da ez jakitea odisea dela; ez jakitea jada itzulia zaren ala inoiz baino galduago, eta ez jakitea jadagoeneko etxerik eta Itakarik batere inon ote dagoen".(...) Bukatzeko beste hau Jainkoari buruz: "Jainkorik ez dago, batzuentzat azken konklusio bat izanen da, horretarainoxe heldu dira eurak: 'ez dago, hori da dena'. Neuri ere uste dut intermezzo batean hala*

*iruditu zitzaidala. Orain abiapuntua iruditzen zait gehiago: "egia da, ez dago –hori behintzat ikasi ahal izan dugu—; asko da: eta orain haizu gara bigarren nabigazio bat haren bila entseatzea, jakinda 'aurkituko' ez duguna Urrezko Ardilarru bat bailitzan".(...)*

*Aurreko aste osoa txapatuta egon gara, niretzat lehen esperientzia arlo honi dagokionez kartzelan. Egia esan gustura egin ditut egunak, ziegan itxita, bazkaltzera eta afaltzera soilik jaitsiz. Hala ere, azkenerako halako zama bat nabari dut, zorabio moduko bat-edo. Asko aurreratu dut Rodoredaren itzulpena, eta Amurizaren azken obraren hirugarren tomoan sartu naiz. Ausardia behar da gero hola idazteko! Ea orain zein den etxe honetako agintarien erantzuna. Badut beldurtxo harramazkari bat: gradu eta destinoen azterketa-garaia da; agian beste nonbaitera bidal nazakete. Ufffa. Kundarik ez, otoi. (...)*

*Jose Luis sufritzen ari da. Migraña basatiekin dabil eta orain ziatikak eraso dio. Astebete baino gehiago darama bajan. Jadanik 74 urte dauzka, eta ez da berdin adinarekin hemen egotea. Berdintsu gertatzen zaio Juantxori, horrek ere 70 baditu eta diabetesaren eraginez gutxi entzuten du, eta ikusi ere nekez. Ankerkeria da hemen edukitzea bi beterano horiek.(...) Martxoan Oskar kaleratuko da. Eta nik honako poematxo hau idatzi diot: "Joanean bahoa / eutsi diok, umotu haiz /zoriturik hago. / Kartzela handia daukak parez pare / askatasunean hazi / ala askatasunean itotzeko/. Hoa eta ez gaitzak erabat ahaztu. / Eutsiko zioagu guk ere / beldurrari gaina hartuz, / inoizko batean, kalean batu arte". Ez dago gaizki.(...)*

*Badator udaberria, edo agian etorri da engoitik. Nire gorputzak laster antzematen du. Antzeman dio urtaro politenari, udaberriari. Suspertu ordez, erabat abailduta uzten nau udaberriak: beti izan da horrela eta orain ere horrela sentitzen naiz: jota, indarrik gabe, gogaituta. Arna-*

*sa falta zait. Gaizki. Horrela egin dut aste hau. Euria egiten duenean, aldiz, askoz ere hobeto sentitzen naiz, urak nire aldartea berregokituko balit bezala. Lurtarrak izaki, lurraren dardarak odolean joka! (...) Nire alabaren familian gauzak ez doaz ondo, eta hemen zailagoa gertatzen da, urrunean. Ez dut gau lasaia izan. Inoiz baino lehen esnatu naiz, kezkatuta. Oraingoz lasai egoten saiatuko naiz: larrituz ez dut ezer irabaziko, ez konpontzeaz gain neroni asaldatuko bainaiz. Ezin izan dut siestarik egin, begiak ezin bildurik. (...) Ilunabarreko bederatziak dira, eta urdail-ahoa uzkurtuta daukat. Bukatu dut La plaça del diamant-en itzulpena, katalanetik euskarara. Laurak disgustotxo bat eman dit, esan baitit lehendik ere itzulita dagoela liburu hori. Kaka! Etsigarria izan da albistea, edozein moduz ez da desastre bat. Ikasteko hasi nintzen itzultzen, eta helburu hori bete da, asko ikasi baitut. (...)*

*Cuban preso politikoak hurbildu edota askatu dituztela entzun dut telebistan. Oso ongi. Hurbilago begiratuta, ordea, preso politiko asko gaude urrunduta. Baina hori ez dut telebistan entzungo. Espainian ez baitago preso politikorik, keba! Batzuetan ahaztu egiten zaizkigu begi bistan dauden gauzak.(...) Ankerrak eta miserableak dira kartzelako arduradunak. Aste honetan Joxepa Arregi hil da. Jexuxmari semeari ez diote baimenik eman amaren ehorzketara etortzeko. Ordez, kundatu egin dute; Granadatik Jaenera. (...) Jose Luis Elkoro beste modulu batera mugitu dute, irteeraren ataria izango al da! Juantxo Rego etxera bidali dute hankan bilurra jarrita. Igor ekarri dute eta berarekin bakarrik nago. Kitxu, berriz, Valladolidera garraiatu dute, pikoloen kaiolan. (...) Jokin Urainek Ez dago etxean argitaratu du. Eguerdian neskek gozokiak pasatu dizkigute: kokozko bolatxo batzuk eta hiru geruzako tarta. Ez da lehenengo aldia holako postreak helarazten dizkigutela. Bertoko mutilok ere egin izan dugu bakarren bat. Oskar eta Igor oso iaioak dira. Nik ere egin izan dut bilobentzat, eta arrakastaz: gure haurrak ezagututa, ona zegoen seinale.*

# -VI-

Europarako eta agian mendebalde osorako mugarri bilakatu zen 1968 urte mitiko hura bukatu baino zertxobait lehenago iritsi zen Erromara mutiko politta. Uda pasatzen Segoviako ikastetxean zegoela jo zioten albistea, alegia Teologia ikastera Erromara bidalitakoen artean zegoela. Biziki poztu zen. Merezi, merezi zuen arren, bera baino kalifikazio hobeak zeuzkan bat bazen, baina hura gehiegi nabarmendu zen erkidegoa *zatitzen* eta beraz, ezin bazter zitekeen era horretara zigortua izatea. Bestalde,mutiko politta osabaren iloba zen, eta osaba bazen nor berak eskatu gabe nagusien borondatea bere aldera erakartzeko.

Gau iluna zen Erromako Termini tren-geltokian sartu zirenean. Euskal Herritik Bartzelonara autobusez eta Bartzelonatik Genoara *Kanguro* konpainiarekin itsasontziz bidaiatu ondoren trenez gurutzatu zuten Italia erdia helmugaraino. Ontzi gainean eman zuten ia gau osoa, ping-pongean jokatuz, kamarotera jaisteari zorakeria iritzita, hain baitzen ederra egokitu zitzaien eguraldia, goian zerua beltz izarrez pikortuta eta behean ur handiak ilun eta sakon, bare-bare. Mutiko politta ez zen bakarrik heldu Erromara —trenez egindako bidaia-zati osoa korridoreko leihoetatik begira—; berarekin batera Jesus Mari zangotzarra, Amable galegoa, Angel gaztelarra zihoazen, ume-umetatik ikaskide izanak denak, azken egokitzapenen kariaz bakoitza erkidego banatan geratu zirenak. Euren artean ez zegoen jarrera txarrik, gehiegi busti gabe, egiten utziz, bizi izan baitzuten prozesu lazgarri samar hura. Terminin ere ez zeuden bakarrik bidaiariak, hantxe agertu ziren Erromako ikaskide euskal herritarrak, Jose Luis eta Miguel, ikastetxe berriraino laguntzeko. Egun argitan

ohartu zen ikastetxe berriak ez zeukala zerikusirik ordura arteko seminarioekin. Klaretarren elitea prestatzen zen han, mundu osotik etorritako seminarista azkarrenak biltzen ziren bertan, eta helburu goren haren arabera antolatuta zeuden. Via Aureliako bazter batean, Ostiarako bidean, kokatuta, eraikin moderno zabala zen Claretianum zeritzan ikastetxea, lorategiz inguratuta, bi solairutan banatuta, non auskalo zenbat naziotako jendeak ikasten zuen. Ugaritasun hark erakarri zuen gehien mutiko politta, batik bat indiarrak, Punjabetik atera eta Alemanian hezi ondoren Erroman batu zirenak teologia ikasten. Haietako inork ez zuen, ordea, Indiara itzultzeko asmorik, Alemaniara baizik, jaioterriarekin alderik ez baitzuen Europak. Hegoamerikarrek, berdintsu, oro har.

Lehen aldiz bizitzan gela propioa izango zuen mutiko polittak bere erara antolatu eta inorekin konpartitu beharko ez zuena. Hurrengo lau urteetan huraxe izango zen bere barnetegi pertsonala, ikasi, lo, amets egin eta babesteko. Pribilegio hark ez zeukan parerik. Berarekin ikasitako kasik denak Salamancara bidali zituzten teologia-ikasketak burutzera eta, eskutitz bidez jakin ahal izan zuenez, xehetasun batzuk gorabehera, seminario bat izaten jarraitzen zuen euren bizitoki-ikastegia, aurrekoen antzekoa. Erroman bazegoen apaiz arduraduna, noski, baina, nolabait esateko, ez zuen seminaristen ardura osoa bere gain, haiek beren jatorriko agintariekin konpontzen baitziren eguneroko martxatik haragoko gauzetan; ia denetan, alegia. Ikasketek ere apenas antzik zeukaten ordura arteko gaiekin: Itun Zaharra eta Berria, Deutoronomioa, Patristika, Teologiaren Historia, Moral Kristaua, Elizaren jatorria, Ebanjelioak banan-banan aztertuak, Pauloren Eskutitzak; eta hizkuntzei dagokienez, hebraieraren hastapenak, ez asko. Irakasle gehienak espainiarrak zirenez gaztelania zen gehien zerabilten hizkuntza, baina jakina, italiera zen hango *lingua franca*, txukun jarduteko nahitaez arrapaladan ikasi beharrekoa.

Berehala jarri zen mutiko politta, ikaskide italiarrei esker, eta arazorik gabe jarraitu zituen irakasle italiarren, alemaniarren, katalanen, amerikarren eta gainerakoen jarduna. Soilik urte betez hartu zituen eskolak Claretianumean, bigarren ikasturterako Lateranum Teologia Fakultate Pontifiziora bidali baitzituzten, etxetik kanpo, bestelako giro batera, orduan bai italiano-italianoz ikastera.

Hogei urte ondo beteak zituen, jakin-mina atsekaitz, askatasun-haizea sudur-zuloetatik gogoaren zokoraino arnasteko aldartea erne, haragiaren grina doi-doi harrotuta eta ilusioak topera. Horrela, bada, kanpora begira jarri zen berehala, ikastetxe barruko giro nasaia, kontrol eskasa eta hiri kosmopolita hark eskaintzen zituen aukerak baliatuz. Betiko erraztasunez menderatu zituen ikasgaiak, portaera-arazorik ez zeukan moldaerraza izanik; ondorioz, gizartearen muineraino abiatu zen gogotsu, naturaltasunez ez ezik borondate-eskakizun inozoz, erlijio-kontuak nahiz egoera sozio-politiko-kulturala barrutik bizitzeko.

Lehenengo sorpresa etxetik atera gabe hartu zuen. Ezuste hark bizitza osoa markatuko zion etorkizunean. Beste seminarioetan ez bezala Claretianumean inori ez zitzaion korrespondentzia kontrolatzen, zetorren bezala jasotzen zen, eta berdin irteerakoa. Egun hartan pakete bat iritsi zen mutiko politaren izenean, igorlerik gabe. Ireki arte ez zegoen igartzerik nor izan zitekeen bidaltzailea. Irekita ere ez, kasu hartan. Gelara igota, instintiboki krisketaz itxi zuen atea, badaezpada. Bi liburu zeuden barruan: Jose Zabala-Aranaren euskal gramatika eta George Stern britaniarraren *Arde Gernika*. Zer zen hura? Nor ote zen bidaltzailea? Zergatik eta zertarako bidali ote zion?

Lehen sorpresa latza euskal gramatikak eman zion. Euskalduna zen mutiko politta, ondo moldatzen zen etxekoekin komunikatzeko, baina sekula ez zuen testu idatzirik irakurri. Euskarak ez zuen tokirik izan bere hezkuntzan, ez hizkuntza gisara ez ikasbide modura. Deus ez. Orriak pasa eta pasa, ez zegoen hura ulertzerik. Erabat arrotz zitzaion mintzaira hura. Euskara da, jakina, esaten zuen bere artean, baina ez dauka antzik etxekoarekin. Bisita-egunetan laguntzen zion kideak bizkaieraz egiten zuen, eta gutxi-asko hartzen zion esanahia. Liburukoa, ostera, seko ezezaguna egiten zitzaion, gehienbat idatzizko molderik ezagutzen ez zuelako. Berak ez zituen gauzak hola adierazten, aditzak ez zituen era hartara jokatzen, esamoldeak ulergaitzak begitantzen zitzaizkion, eta hitz hutsak ere bai, maiz. Bati galdetu, beste bati idatzi, noizbait azaldu zioten haren euskara *sabinianoa* zela funtsean, autorea gerran fusilatutako klaretar bizkaitarra zela, klaretarren artean bazirela batzuk euskara landu zutenak —Zabala-Arana ez ezik Manuel Arriandiaga, zeinak *Itun Zaharra* euskaratua baitzuen—, eta beste batzuk, abertzale izateagatik Euskal Herritik kanporatuak. Haietako batzuk, bizirik zeudenak, Euskal Herria izeneko erkidego sortu berrira itzultzen hasiak ziren, sikiera azken egunak sorterrian bizitzera; ezagunena Gotzon Urrutia, Ingalaterratik itzulia. Jainkoarren! Hari hartatik tiraka euskal erbesteratu bat ezagutu zuen klaretar italiarren Erromako Kurian, Aita Bernaola. Xahar-xaharra zen, edo hala iruditu zitzaion mutiko politari hura bisitatzera joan eta begien aurrean eduki zuenean. Zurtuta entzun zituen haren bizikizunak, aho zabalik ohartu agureari malkoz betetzen zitzaizkiola begiak klaretar euskaldunak aipatzean. Penaturik agurtu zuen apaiz zaharra, abailduta eta etsita antzeman zuelako gizon hura, bizitzak, egoera politikoak eta erlijiosoen zitalkeriak menpean hartuta. Zer gertatzen zen? Mutikoak trakets eta lanabes egokirik gabe aurkitzen zuen bere burua bizitzan lehen aldiz begien parean ikusitako euskal gramatika baten aurrean, eta gainera, hura gutxi ba-

litz, formazio politikorik ez zeukan, ez txikia ez handia, bat ere ez, hain latzak izan omen ziren gertakari hurbilak interpretatzeko.

Bere gelako atea badaezpada ere krisketaz itxita irakurtzen zuen mutiko polittak gauero. Liburu haiek sekretu mingarria gordetzen zuten, izenik eman gabe norbaitek erabaki zuen haren eskura jartzea bezala eta, beraz, garaia zen estalkiak kentzen hasteko, hogei urte aski baitziren bide hura urratzeko. Jabetu zenez, Gernikan bertan egon zen Stern britaniarra Condor Legioak euskaldunen hiri sakratua bonbaz kiskali zuenean, eta han gertatu zenaren berri ematen zion, debalde, egia xehe-xehe ezagutzeko. Bestalde Stern kazetaria zen, mutiko polittak ere kazetari izan nahi zuen, inoiz ganoraz zerbait kontatu ahal izateko, inoren probetxurako.

Bigarren ezustea erlijiosoei eta elizari zegokien, bete-betean. Seminarioko hormak estu iritzirik, berehala ohartu zen kide zaharrago batzuk hara eta hona irteten zirela lan pastorala egitera, eta haietako talde baten ondora lerratu zen, harako gonbita onetsiz. Astean behin Tirado andaluziarrarekin *Lambretta* zaharra hartu eta auzo urrun batera jotzen hasi zen. Vigna Mangani zeritzan auzoa. Labur esateko zakartoki bat zen, trenbidetik beheragoko pendizean planta bakarreko txabola-etxez osatua: zaila zen han zer egin zitekeen igurikatzea. Hura bisitatzea gonbidatu zutenez, joan egin zen. Luze baino lehen ohartu zen komunisten auzo burgoi bat zela, jende xume-xumez osatua, zeinek harrigarriki pozez hartzen zituzten apaizgai ausart haiek. Auzo edo dena delakoaren erdigunean eskolatxoa eta kapera, eta kaperaren atzeko aldean lekaime batzuen etxetxoa. Komunista eta pobreak ziren bizilagun ia denak. Elizarekiko eta apaizekiko etsaigo garbia erakusten zuten nabarmenki, hala ere atariraino betetzen zuten kapera larunbat arratsaldean Luzinio apaiz klaretarraren sermoiak gogotsu entzuteko, Vincenzo apaizgaiarekin

batera kantuan egiteko, eta igande goizetan eskolan biltzen ziren gazteak eta umeak alai asko edozein gai eztabaidatzeko ahoan bilorik gabe: Eliana, Beppo, Alfredo, Antonella, Gianni, Massimo, etab. Komunista gazteak apaizkumeekin elkarrizketan. Bitxia inondik ere. Mutiko polittak ez zeukan aparteko zereginik askoz ere lehenagotik antolatutako talde hartan: ikusi eta ikasi, besterik ez. Oso pozik eta eskuzabalik hartu zuten taldean, galdera ergelik pausatu gabe, adiskidetasun zoragarrian. Jende nagusia ez zen asko inguratzen, baina kezkarik gabe uzten zituzten euren haurrak apaizen artean solastatzen. Hari so, besteari agur, hemengoari entzun, kostata erantzun; haur honi musu, besteari laztan, neskatilei irritxo, nagusiei agur, azkar asko jabetu zen egoeraz.

Zakartoki hartan baztertutako auzoak trenbidetik goragoko auzo ederrarekin bat, parrokia bakarra osatzen zuen ofizialki, bi alde zituena, hain zuzen: goiko aldea, aberatsa, etxe dotorez osatua, burgesena, eta beheko aldea, xumea ia miserablea, etxe makurrez eta hala ere txukuna, langileena, ia denak komunistak. Eliz parrokia nagusia goiko aldean kokatuta zegoen, bulegoak, parrokoa eta gainerako apaizak ere bai; behekoan kapera txiki bat zegoen, nora ezkontza, bataio eta hiletetara jaisten ziren apaizak. Beste harremanik ez zegoen, ezta gogorik ere. Bi aldeak ebakitzen zituzten trenbideak eta lubetak baino zerbait gehiagok bereizten zituen. Behekoek gorroto zieten goikoei; goikoek, behekoei seguru aski erdeinua eta beldurra mutiko polittaren iritziz. Hala ere bazegoen lotura gozorik bi aldeen artean, Sor Cesira, mojatxo italiar bipila, haur eta ama guztien adiskide mina. Mojatxo hura —eta elkarteko beste bizpahiru— komunisten artean bizi ziren natural-natural —pobreak zirelarik euren bihotzeko kuttun— gau eta egun haien zerbitzura, isilik, amultsu, beti haien premien begira erne. Kideek mutiko polittari azaldu zioten, ezen parrokoak ez zituela oso gogoko, ez eurak ez mojatxoak,

ez zela batere fio haien ebanjelizazio-moldez, besterik ezean jasaten zituztela, gutxienez meza eman eta itxura gordetzen zutelako, haur zarpail haiek gustura ikusten baitzituen igandean *ofizialki* doktrinan.

Auzo hartan gizonik ez zela zirudien. Elizara ez ziren hurbiltzen, inolaz ere ez, baina espanturik ez zuten etxeko atea fraide gazte haiei irekita uzteko. Era horretara ezagutu zituen mutiko polittak, hurbiletik sikiera, jende haren kezka, amorru, premia, bizimodu, eskasia eta bozkarioak. Massimoren familia zen esanguratsuena auzoko lidergoan. Haren aita borroka politikoan zaildutako langilea zen. Zioen ezen Erroman bizi arren Vatikano ez zuela inoiz zapalduko, huraxe baitzen haren irudirako burges guztien liztor-habia eta ezkutalekua. Haren negarrak Vincenzo apaiztu zenean, non eta Vatikanon egin zelako haren sagaratze-zeremonia! Bihotzez maite zuen Vincenzo, oso-oso jatorra eta besteak ezbezalakoa zelako, baina Vatikanora joan, ez, hura ez zegoen hari eskatzerik! Eta hantxe geratu zen, bere txabola xumean malkoak xukatuz, bere biraoak tabako merkearen kearekin batera Vatikanorantz jaurtiz. "*Au Vincenzo, ma dove vai al Vaticano; porca miseria!*"

Bi eliza zeuden, edo behintzat bi eredu, horretan zalantza gutxi. Erroma ederra zen, aberatsa memoriari zegokionez, eraikin ospetsuz eta kristau zaharren aztarnaz josita agertzen zitzaion. Ezerk ez zion zirrara sakonagorik eragin katakunbak baino. Doktrinan, seminarioan, hezkuntza eta lagunartean ikasitakoa zekarkion edozein txokok: San Pedro, San Paulo, lehen kristau martiriak, Coliseumeko gladiadoreak eta basa-piztien ahutzetan txiki-txiki eginda fedeari atxikita alai hil ziren lehen kristau adoretsuak, enperadore erromatarrak —asko hain ankerrak eta lizunak— eta ororen gainetik historia eredugarri haren guztiaren abiatzailea, Jesus Nazarethekoa. Historiaren aztarnategi eta altxorra zen Erroma: hiria inguratzen zuten zaz-

pi muinoak: Aventino, Quirinalle, Campidoglio, Palatino, Viminale gehi Esquilino eta Celio; Sant Angelo gaztelua, Panteoia, Caracallaren Termak, Foro Italikoa, San Paulo Extra Le Muri, San Giovanni in Lateranum, Santa Maria Maggiore, Il Gesú; eta nola ez *Cittá* del Vaticano, hango museoak, pinakotekak, eliza barruko handitasun erraldoia —pittin bat lotsagarria edozelan ere— Bernininiren Kolumnak, San Pietro *Piazza*ko obeliskoa, *la Pietá*, *Il Moisé*, kupula borobil izugarria, den-dena zen ikusgarria eta oroitzapenez betea seminarioko korridoreak baino ezagutzen ez zituen mukizuarentzat. Ez zekien nola eskertu hara joateko erabakia hartu zuenari, baina hala ere, bazegoen zerbait higuingarria, gehiegizkoa, bere bihotz sentiberari muzin eragiten ziona, zerbait akigarri eta ezatsegina; behin bisitatzeko, edo bitan, tira, baina Vigna Mangani ezagutu ondoren erraiak iraultzen zizkiona: bi hitzetan esateko, ez zeuden alderatzerik bi toki haiek, Vatikano eta Santa Monika katakonbak, zerbaitek huts egiten zuen bi errealitate hain desberdinen artean. Hautatzekotan hagitzez nahiago zituen lur azpiko korridore buztinezkoak, makur eta ilunak, beren xumetasunean gogoangarri eta bihotz-kitzikagarriak; zer esanik ez, Vigna Mangani, Sor Cesira, Massimoren sendia eta abar, Vatikano inguruan ikusten zituen gona luze eta boneta moreak baino.

Leher eginda eta aldi berean pozik itzuli ohi zen mutiko politta Claretianumera Hiri Betierekoa *Lambretta* zaharrean gurutzatuta, galdera berriak golkoan, intuizio durduzagarriak gogoan. Seminario barruan, kaperan eta jantokian izan ezik, ez zen halabeharrez sotana jantzi beharrik, eta mutiko politta kaleko jantziz irteten zen beti etxetik, han-hemenka, denda xumeetan sartuz erositako arropaz. Behin sotana utzita, hobe erdibideetan ez tematzea, *clergyman* janzten alegia. fraide eta apaiz zintzoa izateko ez zen mozorrotu beharrik eta gero eta higuingarriago irizten zitzaizkion Vatikanon erabilitako jantziak. "*Roma veduta fede perduta*", esan ohi zen, alabaina arriskuan

zegoena ez zen mutiko polittaren kristau-fedea baizik haren adierazpen arranditsua, zeremonia erlijiosoetako bonbazia, elizaren kalterako zena bere iritziz.

Giro eta egoera hartan iritsi zen botoak betiko lotzeko unea. Zalantzaz beteta iritsi zen egun hartara, inoiz ez bezala. Orduak eman zituen ikastetxe aurreko zuhaitz azpian etzanda, George Harrisonen *My sweet lord* abestia behin eta berriro entzunez. Arduradunarengana ere jo zuen aholku eske. Betiko? Nork eskatzen zion betiko lotura? Kontzientziaz jokatzeko esan zion aita Gerardok. Argi ez ikustekotan, uzteko; izan ere ohitura zuen mutiko polittak behin zalantzekin hasiz gero dena pikutara bidaltzeko; beraz, ez fraide, ez apaiz, ez botorik ez boto-ondorik. Lasaitu zen noizbait eta egokiena betidanik zekarren bideari txintxo jarraitzea zegokiola erabaki zuen, zirt eta zart. Halaxe agindu zion Jainkoari betiko pobre, meneko eta haragikontuetan aratz izango zela.

## Frantsesari esker, liluraturik

Igande-iluntze batez etxeratzerakoan bisita zeukan. fraide euskaldun bat zen, norbaitek mutiko polittari gonbita bitxi samarra egitera bidalia, zeinak, jira-buelta handirik gabe Libanora joan nahi ote zuen galdetu baitzion. Libanora! Lehen uneko harridura irentsita, mezuaren nondik-norakoa jakin nahi izan zuen mutiko polittak. Ba omen zekien frantsesa ikasten ari zela eta ikasketetan trebea zela, beraz pentsatu omen zuten agian atsegin izan zezakeela Libanora joan, hango jesuitekin Loiola Unibertsitatean teologia bukatu, arabieraz ikasi eta bertan geratzea. Unibertsitatean frantsesez egiten omen zen; gizartean, ordea, arabiera jakin gabe ez zegoela moldatzerik.

Mutiko polittak ez zekien Libanon klaretarrak zeudenik, baina zirudienez halaxe zen. Mezularia handik zetorren. Tolosaldeko doinueraz mintzatzen zen euskaraz mutiko polittarekin. Frantsesez eta arabieraz bazekien eta gustura zebilen urruti ekinean, baina "gazte-jendea behar dugu, eta agian zuk...". Jarrera positiboa erakutsi zion mutiko polittak, kitzikagarri egin zitzaion urrunera joate hura. Apenas zekien Libano non zegoen, hango egoera gatazkatsuaren berririk ez zeukan; nolanahi ere zergatik ez? Inork ez zion azaldu mezuaren jatorria eta, edonola ere, hantxe geratu zen dena, elkarrizketa hark ez zuen segidarik izan.

Berehala etorri zitzaion frantsesari etekin ziurra ateratzeko abagunea. Osaba legoarekin konpontzea ez zen zaila, Euskal Herriko agintarien baimena lortzea ere ez. Izan ere, huraxe zen Salamancara ikastera joandakoen aldean Erromara bidalitakoek zeukaten abantaila. Uda iritsita, atsegin zuten edozein tokira joateko —ikastera, aztertzera, lanera, etab.— baimena ematen zitzaien, Espainian zeudenek, berriz, gorriak ikusten zituzten asko jota parrokiaren batera norbaiten ordezkapena egitera joateko; hortik landa, deus ez. Hala, Parisera joan nahi zuela frantsesa sakontzera, eta bizi osaba fraidearekin biziko zela, galdegin zien agintariei. Berehala eman zioten baiezkoa, zentro ofizialen batean matrikulatu zedila erregutuz. Osabaren bidez —hura ondo moldatzen zen frantsesez ez ezik bulegogintzan—, *Alliance Française* Hizkuntz Akademian eman zuen izena hilabete baterako. Atsegina eta biziki probetxugarria izan zen Pariseko lehen egonaldia. Probetxugarria frantses hizkuntzari dagokionez batik bat, eta atsegina benetako mundua hurbiletik antzematen ez ezik bere adineko neska-mutilekiko harremanetan lehen pausoak ematen. Osabak autoa zeukan, eta harekin joan ohi zen arratsalde libreetan Frantziako erdialdera —Versailles, Fontenbleau, Chartres— eta Pariseko gune ospetsuenak —Tour Eiffel, Louvre,

Trocadero, L'Arc de Triomphe, Les Invalides, L'Île de France, Notre Dâme—bisitatzera. Klaretarren komentuan askatasun osoa zeukan sartu-irteetarako, behin osaba abisatuz gero; izan ere, bera ez zenez hangoa, ez zuen inoren mendean egon beharrik; bestalde, Euskal Herriko agintariak urrunegi zeuden mutiko polittaren urratsak kontrolatzeko. Osaba, ostera, laguntzaile zen beste ezer baino gehiago. Alde ederra seminarioko estutasunekin! Jakinez gero seguru ez zutela batere begi onez ikusiko Bois de Boulognera bakarrik, liburu bat galtzarbean, joateko hartu zuen ohitura, ordu-puska bat belarretan etzanda hango zingira parean nasai-nasai emanez, jendeari so, haurren zalapartari so, bere urrezko bakardadeari so.

Parisen egoteko ez ezik, abuztuan etxera gurasoengana joateko baimena ere erdiesten zuten erromatarrek, eta hala, bost urte bete ondoren jaioterrira itzuli zen aspaldiko partez, sotana arrastorik gabe batzuen eta besteen harridurarako, komentuan kokatu ordez aita-amarenean geldituz. Apenas inor ezagutzen zuen. Adiskiderik ez zeukan, gutxi-asko bakoitza bere bidean zebilen, eta bera, mutiko politta, hamar urte zituenetik falta zen. Jaioterriko baserriak berrikusiz gain, familia osoari, banan-banan, bisita egin zion, aitaren aholkuei jarraituz: "Higatik ez dadila izan". Goizean mezetara eta gero mendira igotzen zen, jaioterria goitik behatzera, Uzturre gainetik, Urkizu, Leaburu, Hernialde edo Izaskundik. Zein arrotza eta aldi berean zein samurra zen hango ikuspegia! Nolabait, ordea, bazekien hura ez zela bere esparrua, haragoko bidaide izateko hezi zutela, beraz bihotzean antzematen zituen urratu txikiei natural irizten zien, eta azken finean merezi zuela apaiz eta fraide izatea jatorriko sendia eta berezko ingurumena galtzearen truke. Berehala konturatu zen euskaraz egoki moldatzen zela sendian, beti bezain ongi, baina, aldi berean, ez zela gauza diskurtso garatuagoa mantentzeko. Elduaingo elizan ohartu zen batik bat hartaz, Don Antonio erretorearen sermoiak

entzutean eta harekin, *Ertotxe* baserrian, mintzatzean. Hark zerabilen euskara berea baino askoz aberatsagoa zen, zehatzagoa, ederragoa, inoiz entzun gabeko hitzak zerabiltzan; berea, ostera, maingu eta herdoilduta zirudien harenaren aldean, baserri-baserrikoa, labe ondorako egokia, bai, baina elizarako, kulturarako traketsa oso.

Oporretatik Erromara itzulita laster hasi zen hurrengo udako oporrak prestatzen, Frantziara bueltatzeko ahaleginak josten. Erromako Alliancera joaten jarraitu zuen, astean bitan, hizkuntzan gehiago aurreratzera. Maila politta zeukan inondik ere. Han azaldu zioten Alliancek eskaintza dotoreak zeuzkala atzerritarrak Frantziara bidaltzeko. Eta oso erraza zen hara joatea. Ikasketak txukun burutu, urte-bukaeran azterketa pasatu eta kalifikazio egokia erdietsiz gero —oso ongi, gutxienez—, uda igarotzeko tokia aukera zitekeen. Eskatutako kalifikazioa gainditu zuelarik unibertsitate-zerrenda bat eman zioten, lasai aztertu, hautua egin eta udan egoki eta doan baliatzeko. Behin patxadan aztertu ondoren, ez zeukan zalantzarik, Caen aukeratu zuen, Normandian, hizkuntza ez ezik literatura frantsesa irakasten baitzuten bertan. Bestelako aukerak —Montpellier eta Strasbourgen ekonomia, Parisen historia, Toulousen eta Grenoblen filosofia, etab.— arrotzagoak zitzaizkion. Aurreko urteko egonaldian —etxeko gela bakartian zein Bois de Boulogneko belazean— irentsiak zituen Proust, Sthendal, Gide —o Gideren edertasun liluragarria!— eta batik bat *nouvelle roman* saileko idazleak —Robbe Grillet, Serrault, etab.–; beraz, Caen begitandu zitzaion egokiena. Urruti samar ere bazegoen eta, arazogeo grafikoa ez ezik, mutiko polittak bidaiatu egin nahi zuen pixka bat. Parisen egona zen, ondo egon ere, beraz zerbait pertsonalago probatzeko ordua zirudien.

Termini geltokian hartu zuen trena, Austerlitzeko geltokira, Françoise Sagan-en *Bonjour Tristesse* irakurriz. Rue de la Pompen egin zuen ostera lehen geldialdia. Osabari azaldu zizkion bere planak, eta ongi

iritzi zien. Berak eraman zuen autoz Caengo Unibertsitateraino, non ikasle-gela bat eman zioten campusean bertan. Osabak alde egin zuenean aske sentitu zen mutiko politta, beharbada inoiz ez bezala. Esperientzia berriari bere kabuz ekiteko prest. Janzkeran ez zeukan seminarista-trazarik: praka bakeroak, jertse berde argia, artilezkoa, eta lepoan metalezko zintzilikarioa, Borgo Pion erositako maskara erromatarra. Aurreko urtean nabariak ziren Parisen 68ko aztarnak —Boulevard St.Germainen, Quartier Latinen altxatuak zeuden oraindik *pavé*-ak—. Caenen ere baziren: *"Le fusil est le sex des impuissants",* zioen campusaren atarian lurrean letra gorriz margotutako esaldi zabal batek. Jada agortuta zen mugimenduaren partaide sentitu zen bat-batean, seminarioko txokokerietatik harago. *Munduarekin* bat egiten ari zen, testu kanonikoek arimaren etsaitzat harturiko elementu ukiezinarekin: eta ez zirudien oso izugarria. fraideen gehiegikeria izango zen, inondik ere, *mundua* ezagutzen ez zuten agure bakartien mitoa. *Haragiaren* aurpegia ezagutzea falta zitzaion orain. Uste baino era goxoago eta lasaian iritsiko zen hura ere. Hogeita bat urte egin berriak zituen.

Eskolara joaten hasi eta berehala osatu zuten taldetxoa: Fernando nafarra, Juanjo aragoitarra, Gesuina italiarra, Van der Kerkoff holandarra, Jim West eta Sheila eskoziarrak. Bilatzen hasi gabe lehen aldiz neska-mutilez osaturiko taldea zeukan mutiko polittak, eta lagunarte ederra iruditu zitzaion. Begiko egin ziren Gesuina, Sassariko sirena, eta bera; haren edertasun nare eta mutiko polittaren araztasun ukigabeagatik ez ezik, bazutelako elkar ulertzeko hizkuntza-zubia, italiera. Gustuko zuten biek elkarrekin jardutea, huntaz eta hartaz mintzatzea, bizikizunak eta begi-soak trukatzea, bien begi urdinetako ur geldietan kulunkatzea. George Moustakiren *Le metèque* zuten abestirik kuttunena, buruz zekiten eta bozkarioz abesten zuten, gainerakoek bakarrik lagatzen zituztenean.

Mutiko polittak hutsik egin gabe jarraitzen zituen literaturari buruzko eskolak, oharrak hartuz, jasotako iruzkinak garbira pasatu eta bereganatzen saiatuz, jakin gose. Koadrilako mutilek, ostera, askotan huts egiten zuten, kafetegian edo tenis-pistetan laketago. Hasiera-hasieratik garbi utzi zien mutiko polittak nor zen, seminarista, apaiz izateko ikasten zebilela, bera beste hizkuntza bat menderatzen saiatzeko etorri zela Normandiara. Eskolak eman ez ezik, Frantziako kultura eta lurraldeak ezagutzeko programa atonduta zeukaten *stag*eko arduradunek. Hala, bazter ahantzezinak ezagutu zituzten: Deauvile, II. mundu gerrako lehorreratzeari buruzko museoa eta lautadak, hilerri zabalak —gurutzez eta Daviden Izarrez jositako lautadak, berde-gune hezetan luze, Atlantiko zakarraren hegian—, eta denetan ikusgarriena Mont Saint Micheleko abadetxe-gotorlekua lur-mutur biluzian haize-enbatari erronkaka. Marea biziak zirela-eta kontuz ibiltzeko ohartarazi zituzten arren, mutiko polittak, Gesuinak eta besteren batek kilometroak egin zituzten hondartzan, bitsaren bila, itzulian urak jada harkaitzetan danbaka ari zirela apenas konturatzeko denborarik gabe. Abisatu zitzaien areatzan ardura gutxiegiz barneratzen zirenak lakio hilgarrian erortzen zirela: suertea izan zuten behingoz.

Bihurrikeriak egitea atsegin zuen Gesuinak, eta mutiko politta tentatzea ere bai. Normandiako hondartza batera irten ziren ikasle udatiarrak, autobusez. Itzultzeko ordua iritsita, txistua jo eta autobusera abiatzeko dei egin zuten.

—Ezetz geratu?

—Ezetz? Bai, noski.

Eta autobusa joaten utzi zuten.

Berrehun kilometrora geratu ziren bi gazteak, apenas dirurik gabe. Giro epela egiten zuen hondartza bustian, Atlantikoa aurrez aurre zutela. Ilunabarra zen, gaua gertu udako egun hartan. Elkarri begira, zer egin galdezka, zeuden biak, bihotzak bete-bete gaiztakeriaren kariaz. Jantzi eta herrirantz hartu ordez —afaltzeko edo garraioaren bila, adibidez— hondartza barrura abiatu ziren ortozik. Ederra zerumuga, apartsu erraiak, arduradunek bien faltaz ohartzean jarriko zuten aurpegia irudikatuz. Zer gerta zitekeen? Atzerritarrak ziren biak Frantzian. Adin nagusikoak ziren arren, Caengo Unibertsitateko Udako Programan inskribatuta zeudenez, antolatzaileen ardurapean zeuden uztailean zehar. Hor konpon! Zuzendaria bera beste ikasle italiar zoragarri batekin nahastuta zebilen eta kontaezinak ziren bien arteko ihesaldiak.

Harkaitz baten gainean jesarri ziren olatuei begira, orduak pasatzen utziz, axolagabe. Hogei bat metro atzerago bero-bero larrua jotzen ari ziren bi gazte, bisitari gogaikarriei kasurik egin gabe. Nolanahi ere ez zen lekurik aproposena bertan luzatzeko. Hozkirri hezea egingo zuen laster, ura haien gordelekuraino iristen ari zen, eta gainera, soinean zeramaten arropa arina baino ez zeukaten gauari buruz. Altxatu, bidea desegin eta noraezean mugitzea erabaki zuten; poz-pozik, hori bai, barre-algaraka Caengoak gomutan. Koadrilakoek bazekiten nahita geratu zirela hondartzan, bi gazteen baitan egosten ari zena baino askoz gehiago iritzirik, ez zuten deus salatuko. Edo hala uste zuten.

Konturatu orduko errepidean zeuden, itsas gainean biak bakarrik. Ilundua zen, eta ez zuten afaldu. Beharrik ere! Kantuka eta berriketan urrundu ziren herrigunetik, Caengo noranzkoan. Grazia handiz saiatu zen Gesuina errepide erdira irten eta pasatzen ziren auto bakanei auto stopa eskatzen gonak altxatuz. Alferrik. Argi luzeak

ipiniz erantzuten zuten gidari gehienek; beraz, oinez egin beharko ote zuten kilometro-mordoa? Bai zera!, igaroko zen norbait bi gazte errukarriz gupidatuko zena. Bitartean lo apur bat egitea komeni zen. Non, ordea? Hotz egiten zuen, etxerik ez zen, aterperik ere ez batere. Inguruko belaze batean belar-bolak antzeman zituzten, eta lotu gabe zegoenetako bat deseginik belar onduarekin estali ziren, bata bestearen aldamenean. Lo pixka bat egin zuten arren ez zuten asko iraun belar artean, gainean epel baitzegoen baina barruan bustia. Hozkirri kresaltsua hezurretaraino sartzen zen, eta ez zuen merezi ohantze bustian jarraitzerik. Hobe jaiki eta bidean aurrera egitea. Gutxien uste zutenean auto kaxkar bat geratu zen bide bazterrean, bi gazteak hartu eta hurrengo herriraino eraman zituen. Gesusinaren hitz-jario erakargarriari esker, autoa etxepean aparkatu eta bertan lo egiten utzi zien biei, jaikitzerakoan giltzak sarrailan ipinita lagatzeko arren eskatuz.

—Eta autoa eramango bagenu?

—Zuentzat txarrago, luze baino lehen harrapatuko zaituztete *flic*-ek. Antzeman duzue hemengoak ez zaretela...

Hurrengo goizean, lo sakona eginda esnatu ziren biak, inoiz baino alaiago, ezaxola betean. Kafesnea eta *croissant* goxoak irentsi eta berriro bidean ziren, Caengo noranzkoan, berrogeita hamar bat kilometro gehiago egiteko prest. Uste baino lehenago geratu zitzaien furgoneta bat, Caenera zihoana hain justu. Campusera ailegatzean inork ez zien ezer aipatu. Koadrilako inork ez zien kargurik agertu. Mutiko polittak irriño maltzurra nabari zuen Jim West eta Sheilaren begi ñir-ñirkarietan. Besterik ez.

Arazo handirik gabe bukatu zen Caengo ikastaroa, baina mutiko polittak B plana zeukan antolatuta Frantzian beste hilabete bat geratze-

ko. Erromako kide batek deitu zion ezustean, bera azken urteetan Parisera joan ohi zela abuztuan, baina orain Kopenhagera ailegatu nahi zuela, anaiarenera. Lantoki bat bazuela Parisen eta ordezko bila zebilela. Nahi ote zuen lanpostua. Baietz, jakina. Osaba legoari ez zitzaion batere gustatu ilobaren erabakia: komentura etorri ordez bere kabuz etxe arrotz batean ostatu hartzea alegia, bizi eta lanerako. Erabakia hartuta zegoen, ordea. Gesuinari azaldu zion asmoa. Atezaindegi bat lortu zuela Pariseko eraikin batean, hilabete baterako. Bakarrik egongo zela, eta abar. Neskaren erantzuna ez zen berandutu: tokirik izatekotan, elkarrekin egon zitezkeela, berak bazuela zeregintxo bat Parisen Sassarira itzuli aitzin. Tristan Tzararen obra batzuk kontsultatu behar baitzituen Sorbonan, etab. etab. Tokirik zeukanetz ez zekien mutiko polittak, ez baitzuen etxea ezagutzen; beraz, iritsi eta ikusitakoan abisatzekotan geratu ziren.

Atezaindegia etxetzar bateko behe-planta zen. Emakume gaztea zen atezaina, taxista baten emaztea eta bi haurren ama. Espainiara joan nahi zutela oporretan hilabete osorako, eta jakina, ordezko baten premian zeudela. Manuelek ezin zuenez, prest zeudela haren konfiantzazko edonor hartzeko. Soldataren erdia aurreratu eta beste erdia itzulian ordaintzea adostu zuten. Lana ez zen beste munduko ezer: goiz-alban jaiki eta auzoen zakar-ontziak garbiketarako kamioak jaso zitzaten atera, astean behin bi etxe-sailetako eskailerak garbitu eta ezkaratza beti txukun eta lehor edukitzea; eguerdian bi ordu libre bazkaltzeko eta arratsetan 7etatik aurrera erabat libre. Gainontzekoan bertan egon beharra zegoen. Ez zirudien plan txarra, horrela auzoekin frantsesa praktikatzeko, trukean. Halaxe abiatu zuen mutiko polittak bere lehenengo lan-esperientzia inguru erabat arrotzean, bakarrik.

Atezaindegia XVI. arrondizamenduko bazter batean zegoen, Sena ibaitik gertu, Boulainviliers karrikan. Jende xumea bizi zen bertan, frantsesak, etorkin-arrastorik ez. Atso atsegin eta jator askoa zen auzokide bakar behe-plantako aldameneko etxebizitzan. Atea ireki orduko bezperako egunkariak topatzen zituen alboan. "Frantsesa irakur dezazun", esan zion irribarretsu, eta gehituz "mintzatu, nirekin egin ahal duzu, nahi izanez gero". Ia perfektua zirudien plana, eta hala gertatu zen, lehen aldia izateko zinez probetxugarria.

Larrimin bakarra, eta ez nolanahikoa, bizi izan zuen egonaldi osoan. Gau batez begiak aspaldi bilduta lozorro ederrean zetzala, ateko txirrinak jo zuen bortizki eta oin-hotsa nabaritu zuen. Atera beharra zeukan, noski, hartan zalantzarik ez. Gizaseme handi eta baldarra zegoen atearen bestaldean; etxeko giltzak nahi zituen, eta arasatxo bat seinalatu zion mutiko polittari. Atezain titularrak eman zion haren berri, baina ahaztuta zeukan erabat. "*Norbaitek bere etxeko giltza eskatuz gero, eman lasai*". Bitxia zirudien enkarguak, baina hura bazen ohitura... Gau hartan frogatu behar izan zuen enkarguaren inozotasuna, ala ez. Eman zizkion giltzak, eta ohera itzuli zen; alabaina ezin izan zuen berriro lo hartu. Lapur bat bazen, zer? Nork esaten zion hura zela giltzaren benetako jabea? Norbaitek zelatatu bazuen etxea eta konturatu atezain berria, atzerritar gaxtea, zegoela? Zorionez ez zen ezer txarrik gertatu:eguna argitu orduko korrika jo zuen aldameneko atsoarengana.

—*Madamm*e, hau eta hau gertatu da, ondo egin al dut?

—Lasai, *garçon*, etxeko jabea duzu gizon lodikote hori, kanpolarrosa hutsa. Ez kezkatu...

Bigarren astea ondo beteta iritsi zen Gesuina. Ohe bakarra zegoenez etxean —ezkon-ohe zabal-zabala— bertan kokatu zen neska, eta egon-gelako sofa erosoan mutiko politta. Zer gutxiago! Hamabi bat egun geratu zen. Egun zoragarriak izan ziren: eskailerak garbitzen laguntzen zion —zarama ateratzeko ez zion jaikitzen uzten neskari, goizegi iritzita—, elkarrekin paseatzera ateratzen ziren, Sorbonako bibliotekara ere bai neskak bere kontsultak egin zitzan. Erakargarria zen neska hile hori eta txeratsu hura, ohiz minigona laburrak erabiltzan zituen gazte italiarra. "*C'est mignonne ta petite copaine, n'est-ce-pas, garçon*?*"*. Konplimendua eskertu zion arren ez zen egoera argitzen hasi: lagun ona besterik ez zela, atsegin-atsegina nolanahi ere, haragi-konturik ez zegoela euren artean, bakoitzak argi zuela bere bidea, eta berehala elkar agurtu beharko zutela abuztuko azken hondarrean. Zoritxarrez halaxe gertatu zen. Italiara itzuli zen Gesuina, autobusa hartuta. Agurrean, musu emanda, halaxe aitortu zion eskailerak igo baino lehen: "Zurekin izan ezik beste inorekin ez nintzatekeen ausartuko etxe berean mutil batekin bizitzen, bai bainekien ezer ez zela gertatuko". Eta ez zen gertatu. Edo bai. Mutiko polittak eskutitza bidali zion oporrak bukatuta, baina inoiz ez zuen erantzunik jaso. Zinez espero zuen horratio.

Tristeagoa izan zen etxera gurasoak bisitatzera heldu orduko jakinarazi zioten albistea: *"*Claretianum Ikastetxea itxi egingo da, eta seminarista guztiak ostera beren jatorriko tokian kokatu beharko dira*"*. Berriro Aguraingo errota zaharra. Alde ederra, *mon Dieu*!

## *Kartzela-txokoan, beti erne (6)*

*Gaur, egun beltza: nire koinata Jesu zendu da. Telefonoz jakinarazi didatenean korapiloa jarri zait eztarrian. Asko lagundu digu emakume horrek, ezkondu aurretik eta gero. Beti egon da adi. Herri txikitik atera gabe hil da. Bere xumean emakume askea izaten saiatu da: gaizki ikusita zegoenean gizonarekin ateratzen zen baxoerdiak edatera, erdeinuzko begiradei iskin eginez. Esaten zuen senarrak eskubidea bazuen tabernara sartzeko, berak ere bai, eta gauza berberak egiteko. Bakoitzak bere mugak gainditu behar ditu, ez besteenak. Diabetesak jota hanka bat moztu behar izan diote. Bigarrena mozteko unea iritsita, ezetz esan du. Eta bakean joan da. Marik faltan hartuko du.(...)*

*Mikel Antzaren Ospitalekoak irakurri ditut. Sasian ere idazten jardun duela ematen du. Niri eredugarria iruditu zait: idazkera bizia, irakurterraza, erreferentziaz betea, sekulako trebetasunez darabil hizkuntza. Nire gobernurako gauza batzuk jaso ditut: "Kartzelatu aurretik erabili izan ditut, hitzez eta idatziz, koherentzia, leialtasuna eta duintasuna moduko hitz potoloak. Erabili izan ditut kontraesan, traizioa eta gezurraren modukoak ere: geroztik ikasi dut benetan duten esanahiaz jabetu gabe lardaskatzen nituela, haize kolpeak hegaldatzeko puxikak zirela, mamirik gabeko kontzeptuak. Orain, ahoskatu aurretik luze beratzen ditudan berunezko gozoki, batzuetan mikatz, bihurtu zaizkit, beldurra eta erosotasuna eskuz esku ikusi baititut kontraesanari eta gezurrari agintzen, koherentzia eta duintasuna hobiratzeko. (...) Lehen ez nuen hurkoaren egintza ulergaitzen zergatia hausnartzen ibiltzeko ohiturarik. Nik orduan moldatze, egokitze eta aldaketa hitzei mesfidantzaz begiratzen nien, ez ote ziren hitz ponposo horiek damutzea, amore ematea eta burua makurtzearen apaingarriak baino. Urte guztiotan txerto eraginkorra izan da niretzat gure aurreko belaunaldiko gehienen amore emate mozorrotua". (...)*

*"Nire burua ez dut ez biktimatzat eta ez gaixotzat. Egoera larrian nagoen arren... badakit zergatik kartzelatu ninduten, eta egoera larrienean egonda ere ezinezkoa zait nire burua biktima gisa ikustea, ez bada letra larriz idazten den historiaren zurrunbiloan denok biktima garen neurrian. (...) Kartzelak herio kiratsa hedatzen du. Hemen ere ahots loarazle batek une oro diosku: obeditu eta dena ondo joango da; ez hartu erabakirik arazorik izan nahi ez baduzu, alferrik da ezer aldatzea; errebolta oro aldez aurretik galdutakoa da.(...) Nola itzuliko gaitun gu? Ez etsaiari errekisatutako tankeen gaineko bizardun haiek bezala... Ez, noski. Guk ez dinagu halakorik nahi izan sekula... Ezer gertatu ez balitz bezala. Gure absentziaren prezioa, oker zeudenak zuzentzea besterik izan ez balitz bezala. Gure zorionaren hildakoei barkamena eskatzea. Eta gure sufrikarioen arduradunei barkatzea. (...) Ba al dago erabakirik hartu behar ez izatea baino egoera gozoagorik? Garena gara, egin duguna egin dugulako... Horregatik da itxuraz hain gozoa erabakirik hartu behar ez izatea. Baina hori ez da bizitzea. Bizitzea erabakiak hartzea da eta erabakien ondoren erantzukizuna eta ardura onartzea". (...)*

*"Askatasuna zer den galdetu diot nik nire buruari. Eta erantzuna gutxi gorabehera hau: inoren menpe bizi izan haiz beti, aukeratu omen hinduen Baten esaneko, maitatu izan hauen Baten erantzule, hire bide propiorik antzeman ezinik, beti norbaiten mende. Goxoa izan da mendean bizitze hori, une kitzikagarriak bizi izan dituk, inoiz besterik bizi izango ez dituanak behar bada. Askatasuna hori dena alboan uztea da, izan daiteke, paradisutik at, beste paradisuren atezuan, non dagoen ez dakiala". (...)*

## -VII-

Erromatik Agurainera egindako jauzia ez zen batere samurra izan. Gogo gabe emandako pausoa zen, jakina, baina mutiko politta, neurri batean ez zen bere erabakien jabe; neurri handian, hobeto esanda, zeren, Ordena bateko kide izanik eta betiko zinak eginda, agintarien esku zeuden guztion destinoak, zereginak, etab. Oso aldatuta topatu zuen errota zaharra: isiltasun-eremua zena erlauntza koloretsu eta zalapartaria bihurtua, izan ere bertan kokatu baitzituzten seminarista gazteenak, egokitzapen-obra batzuk eginik. Mutiko haiek ez ziren garai bateko umemoko triste eta inozoak, askoz ere bihurriago, lotsagabe eta harroagoak baizik. Hamabi bat urte joanak ziren mutiko politta Balmasedan sartu zenetik, eta sei bat nobizioaldia bukatu zuenetik.

Seminaristekin ez baizik helduen komunitatean kokatu zuten mutiko politta, goiko solairuan, ia-ia teilatupean, bakarkako gela batean. Gaitz erdi. Xumea zen bizitokia, horma irregularrez etxearen hegoaldera moldatutako hutsune biluzia besterik ez. Ohantzea, konketa, mahaia, aulkia eta apalategia zituen etxeko-tresna bakar. Laster jantzi zuen biluztasun hura horma-irudi esanguratsuz, eta han-hemenka erositako era guztietako liburuz eta laminez zein oroigarriz, espazioari jite bizigarriagoa emanez. Garitzak, soroak, etxe-inguruko fruta-arbolak, errekastoa eta baserriren bat ikus zitzakeen lautada arabarreko puntu hartan.

Hasieran gogo txarrez, espantu handirik gabe moldatu ziren bi erromatarrak Agurainera, aspaldiko kide batzuekin batera, apaizbide nahiko aurreratuan esperientzia desberdinak nahastuz. Goizetan

Gasteizera ikastera joaten ziren arren, arratsaldez seminarioan laguntzen zuten, gaztetxoei eskolak ematen. Mutiko politttak frantsesa irakasten zien, Paris eta Normandiako esperientzia baliatuz. Oro har ez ziren urte txarrak izan hurrengo bi urteak.

Erlijio-ordenetako seminario gehienak hustutzen hasita zeuden orduko Vatikano II.aren ondoko sekularizazio-uholdeak —pertsonaren autonomia aurkitu berriak— errotik astinduta. Bakoitzak ahal izan zuen erara moldatu behar izan zuen bere etorkizuna ziurtatzeko, eta ardura handiz zaintzen zituzten oraindik prestakuntza-zereginetan ziharduten gazteak, jendearengandik hurbilago kokatuz, ahal zela apaiz zailduagoen ondoan saiaraziz, eta ikasketei zegokienez etxetik kanpoko Fakultateetara bidaliz. Biziraupen-kontua ere bazen, zalantzarik gabe.

Gasteizko Teologia Fakultatea Elizbarrutiko Seminario Zaharrean kokatuta zeukaten, eta han, bertako seminaristak ez ezik pauldarrak, sakramentinoak, betarramitak, beneditarrak, klaretarrak, etab., dendenak mendeetako eskema zaharkituak gainditu eta Vatikano II. Kontzilioak putz egindako sua bereganatu nahirik. Irakasle-talde ospetsua egokitu zitzaion: Setien, Pagola, Zunzunegi, Abaitua, Balda, Txintxetru, Yurre, Arana, etab., bakoitza bere espezialitatean aditu, batzuk polemista zorrotzak, beste batzuk ikerlari saiatuak, gehien-gehienak jator eta hurbilak, gizarte-zientziak, ekonomia, psikologia eta beste arlo berri ukitzen berezituak. Seminaristentzat gehienak kontserbadoreegiak ziren, jakina.

Gaztelaniaz mintzo ohi ziren nagusiki, baina euskara ere erabil zitekeen beldurrik gabe. Urak bere bidea egina zuen harrezkero, eta giroari atxikita, euskararen harrak jardunean zeukan hainbat kide. Ez ziren falta euskaldunak elkartean, eta batzuk kostata eta beste

batzuk ikasteko gogo amorratuz saiatzen ziren zekitena hobetzen. Gehiengoa erdal hiztuna zen, hala ere. Mutiko polittak prestigioa zeukan horretan. Elkarte berriaren sorreran bigarren mailan egon zen arren, euskararen alorrean ondo samar zebilen, etxetik zekarrenari esker erabat, baina nolanahi ere etsi antzean sentitzen zen bere baitan, kultur jasorako kamusturik zeukala jakitun. Bibliotekan baziren euskarazko liburuak, bai, denon bistan, baina berak maisuak behar zituen, larreko mintzaira goragoko maila batera igotzen laguntzeko. Argi zeukan hura komentutik at bilatu beharko zuela.

Karrerako azken bi urte haietan gorpuzten joan ziren batzuen eta besteen zaletasunak, mutiko polittarenak ere bai. Batzuek urruneko misio-lurraldeetara bidaiatu nahi zuten pobreen zerbitzura, bide klasikoenetik arima erratuak salbazio-bidera ekartzearren; beste batzuek, teologian, espiritualitatean, bizitza erlijiosoaren interpretaritzan edo gisako diziplinatan sakondu nahi zuten irakasle izateko asmotan-edo, unea iritsita parrokiaren batean, seminaristak artatzen etab. taxuz saiatzeko. Mutiko polittari ez zitzaion horrelakorik interesatzen, teologiak eta ohiko ikasketek ez zioten barrua kitzikatzen. Berak kazetari izan nahi zuen, Claret bezala, eta oroz gain Euskal Herrian geratu, urrutira alde egin gabe. Euskara taxuz menderatzea zen lehen egitekoa, euskararen bitartez euskaldunen bihotzetara iristeko. Lehenengoz teologia bukatzeko esan zioten agintariek, eta gero aztertuko zutela gogo hura. Bidezkoa zirudien, baina berak presa zeukan, irrikatan zegoen lanean hasteko, lan tradizionalak laga eta era modernoagoetan murgilduz. Noizbait bukatu zituen teologia-ikasketak, eta dena borobiltzeko, lizentzia ateratzeko Iruñean azterketa pasatzeko eskatu zioten, beste guztiei bezala. Mutiko polittak, ordea, ez zeukan ezer irabazteko. Teologia-bidean jarraitzeko asmorik ez zeukanez, ez zuen burua nekatu nahi izan lau urteko gaien zerrenda sistematikoki berrikusteko. Egia esan, beldur pixka

bat ere ematen zion halako azterketa orokorra egiteak, areago bere ikastaldia anarkiko samarra izan zelarik, han eta hemen probatuz behin asignaturak gaindituta; beraz, belarrietatik tiraka eramango ez zutenez, etxean geratzea deliberatu zuen, teologiako orriak betiko zarratuz. Ordurako *konpromisoa* zebilkion itzulika erraietan ez ezik gogo-asmoan, batik bat González Ruiz kalonje malagatarraren *Creer es comprometerse* liburua topatu zuenetik. Zehaztasun handirik gabe "jendearen alde" jarri nahi zuen osotara, estilo berrian, beste aire bat eman nahirik balizko bere apaiz-jardunari.

Ordurako hazten ari zen Erroman ereindako hazia, Euskal Herriaren gertakari politikoaren harira, eta euskaldunen historian bere burua kokatzen ahalegintzen zebilen, apaiz eta fraide bati zegokion eginbeharra definitu nahirik. Ofizialki gaizki ikusita zegoen erlijiosoen jardun politikoa, baina ohartuta zegoen inork gutxik gaitzesten zituela erregimen frankistaren aldeko kideak; hura ere ofizialki, noski. Izan ere baziren —adibidez kontatu zioten Balmasedako seminarioko arduradun bat bertako klaratar moja abadesarekin batzen zela monasterioan herriko faxistekin—, baina itxuraz hura ez zen jardun politikoa; jardun politiko bakarra, beraz gaitzesgarria, separatistena zen nonbait. Gaia ilustratzeko, adibide bat: Iruñeko seminariora bidali zuten apaiz abertzale bati hitz hauekin egin zion agurra orduko errektoreak: *"Hemen ez dugu politikarik onartzen, hemen denak gara karlistak"*. Ez zuen gaia ondo kontrolatzen baina, edozein moduz, landu beharreko kontua begitantzen zitzaion. Herri ukatuak ere —ukazio harengatik— pobreak direla azaldu zioten; pobretasun bakarra ez dela, alegia, norbanakoen pobrezia materiala zein morala, biziguran ari diren herrien miseria eta ezina ere alor hartakotzat kontsideratu behar direla; beraz, auskalo zergatik, familiaren historiarekin ez bere hezkuntzarekin batere loturarik ez zeukan unibertso batera iristen ari zen emeki-emeki mutiko politta.

Gogoeta haietara kateatuta zebilela eskutitz bat jaso zuen atzerritik. Ez zen espero zuena, baina gustura irakurri zuen *air-mail*ez etorritako gutun-azala: Jim West zen. Eskutitzean zioen, behin ikasketak burututa urte beteko egonaldia egin behar zuela, nahita nahi ez, Frantzian titulua eskuratzeko, eta zeuzkan aukerak aztertuta Orthez hautatu zuela hurrengo urterako, Euskal Herritik hurbilen zegoen tokia izanik erraz ikus zezaketela elkar. Zein ondo, pentsatu zuen mutiko politak komentuko gelaren leihotik urrunera begira. Zein ondo, Jim West.

**Euskara salbu ikusi arte...**

Jim West neska eskoziar zoragarria zen. Gorputzez ttikia, bi masailak eta sudur-buelta oriztaz josita zeuzkan, eta aurpegia, berriz, beti irribarrez loratuta izan ohi zuen. Ez zen Gesuina bezain dotorea, nolanahi ere maitagarria eta adiskide fina zirudien. Mutiko politak estimu handitan zeukan, behintzat. Ia-ia ahopeka mintzatzen zen beti; hitz egiten zuenean, ohiz isilik eta behatuz egotea baitzuen laketago. Frantses-ikasketak, filologia-motaren bat seguru asko, egiten ziharduen bere jaioterrian, horregatik topo egin zuten Caenen. Inoiz, edo ia inoiz ez, ez zen Sheilarengandik apartatzen, huraxe ausartago eta bihurriagoa baitzen. Biek bazekiten mutiko polita Gesuinarengan zituela begiak, baina badaezpada ere Sheilaren itzalean ibiltzen zen beti Jim Wesst, amua botatzen-edo. Ilunabar batean *party* bat antolatu zuten nesken egoitzan, eta bertan egon ziren mutil gehienak, baten edo besteren gelan, taldeka sakabanaturik. Amaieran, ezohiko ausardiak eraginda, bere gelara gonbidatu zuen Jimek mutiko polita. Goizaldera arte jardun zuten hizketan, berriketan, inoren testigantzarik eta trabarik gabe elkarren berri izaten. Orthezen hilabete

batzuk eginda, Aguraingo errota zaharraren atarian agertu zen Jim West eskoziarra, bakar-bakarrik berriro.

Besoak zabalik hartu zuen mutiko polittak eta, idatzi gabeko komentuko arauak hautsirik, gelaraino igo zuen, nola bizi zen ikus zezan, bihotza non zeukan pertsonalki uler zezan, adiskide bat bazuela etxe hartan, apaizgai adiskidea. Ohi bezala apal eta irribarrez ezagutu zituen neskatilak mutiko polittaren inguruabarrak oro, iruzkin batzuk egin eta funtsezko zenbaiti galdera pausatuz. “Orain ulertzen dut dena”, esan zion agurrean aurpegia lepoaren kontra tinkatuta. Hala ere, Orthezeko ikastaroa bukatuta berriz etorri zen Euskal Herrira, Donostiara, Santa Maria karrikan ostatu hartuz beste neska eskoziar batekin. “Gesuinarekin zer moduz?”, jakin nahi zuen, betiko alde egin baino lehen. Mutiko polittak egia esan zion ostera, ez zekiela ezer, idatzi zion arren ez ziola sekula erantzun, edozein moduz... Lasai joaten sumatu zuen neska, eta joan aurretik eskoziar abertzaleen txapa —bi begizta urdin hondo horian— laga zizkion oroigarri. Urte bete geroago ezkondu egin zen Jim West diplomatiko batekin, eta Berlinera aldatu ziren. Ezkon-tartaren zatitxoa bidali zion dotore bildutako paketetxoan, eta betiko desagertu zen, beti bezain zuhur, beti bezain zintzo.

Aguraingo udak zinema ikasten erabiltzen zituen mutiko polittak. Salamancan egondako donostiar batek jakinarazi zion hiru udatan ikas zitekeen oso programa egokia zutela Valladolideko Unibertsitatean, Letretako Fakultatean, Carlos Staëlin jesuita alemanaren gidaritzapean. Hura burutzean txosten bat aurkeztuz gero, Diploma bat libratzen zuten. Baimenak hartuta bertan matrikulatu ziren lau lagun, lehenengo urtea alokatutako etxe batean eta hurrengo bietan jesuiten egoitza batean; Andaluziatik igotako beste teologo klaretar batzuekin. Bidebatez, uda parrokia hits batean mezako orduak

irakurtzen pasatzeko zigorra baztertzen zuen... Aspaldikoa zuen zinema-zaletasuna mutiko polittak, Santo Domingoko garaietatik zetorkion, kazetaritza deskubritu zuenetik, hain zuzen. Han zinema ikusterik ez zegoenez —lau urtean bi film ikusi zituzten: *Poliana* eta *Gigante*— zinema-kritikari buruzko aldizkari bat —*Reseña*, jesuitena hura ere— jarraitzen zuen hurbiletik. Erroman, berriz, ikastaro sistematikoa egin zuen Nazareno Taddei jesuitarekin, eta han ikasi zuen filmak xehetzen, zati-zati egin —batzuetan fotogramaz fotograma— eta haien egitura aztertzen, ondoren edukiari buruzko interpretazio globala erdiesteko. Metodo estrukturalista omen zen. Haren kariaz pelikula asko ikusi zituen, ikastaroko zine-klubean ez ezik Erromako aretoetan. Bestela ikustera arriskatuko ez zen pelikulak ikusi zituen, era guztietako giza harremanetan —haragi-korapiloetan ere bai— sakonduz. Gogo estetiko hutsa baino hagitzez harago zihoan zaletasun hura, izan ere bekatuaren debekua gainditzeko modua ere bazen mutiko polittarentzat; ez, ordea, zalantza mingarririk gabe, noski.

Ikastaro haietako baten amaieran Madril ezagutzea erabaki zuten lau kideek, Euskal Herrira itzuli baino lehen. Preciados kaletik behera Sol plazarantz zihoazela hara non Antonio osaba legoa, inpentsan, azaltzen den kontrako bidean, Preciados kalean gora hain juxtu. Agurrak eta aurkezpenak eginda urduri sumatu zuen osaba, taldearen janzteko moduagatik-edo harriturik. Mutiko polittak hilabeteko bizar horaila zeraman, soinean amak erositako praka urdin argiak eta alkandora arrosa; oinetan, berriz, zapatila urdin ilunak. Gainerakoek, halatsu. Bueltan gurasoen etxeko atea jota, aitak ireki eta, goitik behera begiratuz, muturraren aurrean itxi zion, danba, zakar, apenas hitzik esan gabe. Hura marka! Bera baino lehen iritsiz nonbait osabaren dei artega jaso zuten: ”Gaizkile-itxurarekin ikusi dut Madrilen“ (*facineroso* hitza erabili zuen, prezeski), gurasoak asaldatuz.

Handik urte batzuetara aitari telefonoz abisatu zionean, "bizarra kentzea pentsatu dut", "etzak horrelakorik egin", ihardetsi zion aitak berak denborarekin semearen bizarrarekin ohituta. Teologia-ikasketak bukatuta, meza emateko asmorik bazuen galdegin zioten erkidegoko arduradunek. Baietz, mutiko polittak, baina "ez euskara txukun menderatu baino lehen".

Hala Donostiara bidali zuten euskaraz alfabetatzeaz gain hango ikastetxean edota parrokian lagun zezan. Ordea, ikastetxea eta parrokia oso bigarren mailako kontuak ziren beretzat; izan ere, berak bide berri bat urratu nahi zuen, garaiekin lotuagoa eta bere aldartearekin egokiagoa. Ez zuen bere burua zeregin tradizionaletan ikusten —meza ematen, jendea aitortzen, etab.—. Kazetari izan nahi zuen, zegozkion baimenak behingoz eskuratuta. Hala ere bidezkoa iruditu zitzaion ikastetxean edo parrokian ari zirenei laguntzea, azken finean elkarte berean bizi ziren eta zeregin batzuk konpartitzea komeni zen guztion hobebeharrez. Erlijio-eskolak ematen zituen goizean Zurriola ertzeko ikastetxean eta euskaraz trebatzeari ekiten zion ilunabarretan. Oso lekuz kanpo sentitu zen eskola haiek ematen, iruditzen zitzaion gela ez zela lekurik aproposena erlijioa irakasteko, ez bazen haren historia eta eduki kulturala. Deserosotasun hura asaskatzeko beta eman zion patuak, gazteen artean ardurak hartzen lehen aldiz; izan ere, *boy-scouts* taldeko kapilaua Madrilera jo zuen bere burua pittin bat egurastera, eta mutiko polittari eskaini zioten plaza. Hezkuntza ezarautua zen hura, denbora librekoa, hango neska-mutilak euren kabuz eta borondatez ari ziren taldean, eta kapilauaren zeregina bere esku zegoen erabat, arauetatik eta tradizio zaharkituetatik askeago. Monitore gazte-helduek oso gustura hartu zuten mutiko politta euren artean. Arazo bakarra oraindik apaiztu gabea zela, eta beraz, ezin zien meza eman. Paraliturgia aproposak egokituz gainditu zuen egoera hura, Huub Oosterhuis-en otoitzak

proposatuz, eta eztabaida luze-sakonagoetarako Katixima Holandarra erabiliz. Euskarari zegokionez ez zebiltzan oso trebe gazte haiek; eliz instituzioari egurra ematen, ordea, bikain.

Euskara zen, ordea, mutiko polittaren ahalegin-alor behinena. EUTGn matrikulatu zen, alfabetatze-hobetze ikastaroan. Talde txikia osatzen zuten bere mailakoek. Bi irakasle ezin jatorragoak suertatu zitzaizkion, zein baino zein egokiagoa bere helburuak betetzeko. Erritmo bizia ezartzen zioten eskolari, ariketa asko eta praktika ugari egiten zituzten eta, gainera, giro bikaina sortzen arduratzen ziren. Azkar jarri zen mutiko politta euskara-molde hartara —*batua* esaten zioten— Patxi Altuna eta Koldo Mitxelenaren testuak lagun. Txillardegik atondutako aditz- eta deklinabide-sistemak —*Euskara batua zertan den*— ez zizkion Zabala-Aranak sortu zizkion buruhausteak sortzen. Bide zuzenean zebilen, alafede, geroak ongi frogatuko zionez, eta etengabeko formakuntzan, herrian lotsarik gabe jarduteko asmoz. Donostian bizi zenez inoiz baino errazago zeukan gurasoengana joatea eta, bisita haietako batean honela mintzatu zitzaion ama: "Tú eres muy vasco, no; seme?". Zur eta lur geratu zen inoiz erdaraz hitzik egin ez zion amak erdaraz horrela mintzatzean. Ama ez zebilen hizkuntzari buruz mintzatzen; amak, galdetu gabe ere, seguruenik bazekien semearen nondik-norakoa. Eta badaezpada ere hortxe utzi zion gogoeta.

Eta egia esan, ama ez zebilen oso erratuta. Erroman ereindako hazia uzta ematen ari zen eta Euskal Herria bete-betean topatu zuen Donostian mutiko polittak. Konturatu zen gatazka hark bazuela zerikusia elizarekin, eta ez nolanahikoa, eta elizkideen artean alde batekoak eta bestekoak zeudela, alegia Euskal Herriari bere eskubideak ukatzen zizkiotenak eta haiek aitortzeagatik bere askatasuna eta bizia arriskuan jartzen zutenak. ETAn ere baziren apaizak edo

apaiz izandakoak... Urte haietan sona handiko ekimen batean parte hartu zuen mutiko polittak. Zamorako espetxe konkordatorioan hainbat apaiz euskaldun zeuzkaten preso: Nikola Telleria, Alberto Gabikagogeaskoa, Jesus Naberan, Julen Kaltzada, Martin Orbe, Xabier Amuriza, etab. eliza pobrea eta euskalduna exijitzeagatik ez ezik herriari zegozkion gauzetan modu pertsonalean inplikatzeagatik. Istiluak gertatu omen ziren Zamoran, eta apaizak matxinaturik zebiltzan, hain urruti. Gertakari haien karietara itxialdi bat antolatu zuten Donostiako seminarioan, eta hara joan zen mutiko politta. Han ezagutu zituen hainbat apaiz gipuzkoar, abertzale, Herri Gaztedikoak, HOAC-JOCekoak eta beste batzuk. Gogor mugimenduaren berri izan zuen, apaiz haien eta Setien gotzainaren arteko ika-mika eta tira-birak kontenplatu zituen zuzenean; bidebatez, eliz agintarien mugak zeintzuk ziren harritu samarturik nabarmendu zituen, kasu hartan, Setienenak ez ezik aurrekoenenak: Berreziartua, Argaia, Zirarda, Mendez eta beste batzuenak. Asteburuan elizetara jaitsi eta bertan irakurtzen zituzten asanbladako dokumentuak meza orduan. Dokumentu haietako batzuk mutiko polittak berak erredaktatu zituen Andu Lertxundirekin batera. Haren guztiaren kariaz gatazka politikoaren zipriztin batzuk lohitu zuten ezinbestean. Kontuz ibiltzeko, jesuita ezagun batek ohartarazi zion polizia galdezka zebilela Atotxako Frantziskotarrenean egindako paraliturgia baten kariaz. Harreman estu-estua zuen kaputxino bat kartzelara eraman zuten urtetarako, eta aldamen-aldamenean eduki zuen erbesterako bidea hartu behar izan zuen gasteiztar gazte bat... Beste eliza bat, beste kristau-olde bat, Euskal Herri osoki aitortuan, huraxe izan zen mutiko polittak topatu zuena Donostian, maitatzen ikasi zuen, eta prest zegoen haren alde bizia emateko.

Beste behin bizitza laburrean erantzunik gabe utzi behar izan zuen emakume baten gonbita: haren begi eder eta ile-adats beltz-beltzak,

haren ezpain bete dardartiak, haren jarrera abegikorra, haren gorputz epela ez ziren aski izan gotorlekua eraisteko, sentimenduei men ez egiteko blindatuta jarraitzen zuen mutiko polittak; hala ere, nonbait, oso sakonean, erraiek zioten pittin bat saiatuz gero, hura bai, hura izan zitekeela bere bihotzaren asegarri, baina ez zen izan: beste behin, gupidarik gabe erre zituen bere, eta emakumearen, sentimendu erneberriak sakrifizioaren aldarean...

Heriotzak oztopatu ezean gauzak heltzen direnez, mutiko polittari ere heldu zitzaion bere ordua; apaiz egitekoa, kasu hartan. Donostian edandako ur osasuntsuarekin ez zeukan zalantzarik: apaiz izango zen zurrunbiloz eta ur-lasterrez betetako Euskal Herri hartan parte hartzeko gogoz, berak zekien modu bakarrean. Agian horrexegatik "herriko apaiza" ipini zuen meza berriko oroigarrian. Amak nahiko zukeena kontuan hartu gabe, ez zuen amore eman holakoetan estanpetan ateratzen zen argazkiari zegokionez: apaiz gazte berria kaliza eskuetan, edo ogi sagaratua altxatzen. Bere oroigarria kartulina urdin xumea izan zen: "hel esperantzari" zioen, alfabetatu berriko euskal adiera zapore gabekoan. Setien gotzainaren oinetan etzanda eta hari eskua emanda, meneko izango zitzaiola aginduz, sagaratu zuten apaiz, umetan meza-mutil izandako eliz berberean. Zakar samar aritu zen bere lehen predikuan: "Zer etorri zarete ikustera?", San Joan Bataiatzailearen hitza gordinak familia hunkituaren eta eliztar saiatu errugabeen artera jaurtiz. Egun hartan ez zeuden denak elizan, bat falta zen.

## *Kartzela-txokoan, beti erne (7)*

*Bide berri bati ekin diodan arren, eta gogotsu gainera, batzuetan abailduta-edo sentitzen naiz, ideia ergelen batek erasoa: gaur bertan horren aurrean zer egiten ez dakidala eta tristaturik, hara zer irakurri diodan Josune Bereziartua eskalatzaile ataundarrari: "[horma zail batean zintzilik zaudela] zure burua baino ez duzu entzuten (...); une horretan, zure helbururako balio ez duzun oro baztertzen duzu, zama arinduz (...). Eta distraitzen bazara, pasatzen uzten duzu, ez duzu ideia edo emozio horren kontra ere egiten, pasatzen uzten duzu, hodei bat balitz bezala, eguzkia estaltzen du une batez, baina joan egiten da. Orduantxe esan dezakezu 'forman nago'". Eder-ederra iruditu zait. Zergatik ideia negatiboen kontra saiatu, emozioak estaltzen tematu. Hor daude, pasako dira. Tematuz gero finkatu egiten dira, iltzatu, eta min izugarria eragin. (...)*

*Joxe Arregi frantsizkotarraren erabakia irakurri dut Berrian: fraidetza utzi du, Ordeneko anaien artean "liskarra ekiditeko", eta batik bat bere egiak, bere uste eta iritziak "askatasunez" esan ahal izateko, isilik baina seguru, meneko baina babesturik jarraitu ordez. Hunkitu egin nau bere determinazioak, lur ezegonkorrera jauzi egiteko prestutasuna, bere penak Ordena utzi beharra bizitzeagatik, eta bere zalantzak eta beldurrak bulartsu asumitzeagatik. Nola ulertzen dudan! Hala ere nik ez daukadan segurtasunak bizi du Joxe: "Noan tokira noala, Jainkoa nirekin etorriko da". Ni bakardadearen mina eta urradura bizitzen ari naiz, eta hor ez dago Jainkorik... nik dakidala. Bakardadea "adiskide min eta leiala" dela dio George Moustakik bere La solitude abestian, baina orain, bizitzan lehen aldiz ohekide dudalarik, ez nago hain seguru. Garratza irizten diot haren isiltasunari, hitsa bere aurpegiari, izotzezko begiradari. Aldatz gora egiten zait bizitza, baina joan banoa. Aupa ni! (...)*

*Heriotza berriro sartu da gure galerian. Motos ijitoaren txanda izan da, oraingoan. Ezustean izan den ez dakit seguru. Zurrumurruek diote pilula bat eman ziotela bart, eta goizean zendu da. Beste batzuek diote hiru egun zeramatzala ondoezik, erizaindegira joatea eskatu eta ukatu egin ziotela. Joan denean, bertan geratzea agindu zioten arren ez zuela nahi izan, eta goizean zerraldo agertu da. Nik dakidana hauxe da, besterik ez: gosaltzera jaisterakoan balantzaka ikusi nuen atzo, kide batek lagunduta eskailerak jaisten. Mozkortuta dagoela iritzi diot, eta halaxe komentatu diot Igorri. Nor zen Motos? Ez dakit, ez neukan feeling berezirik berarekin. Oso zakarra zen, hezigabea. Urte asko zeramatzan kartzelan. Norbait akabatu omen zuen. Arazoak omen zeuzkan emazte ohiarekin. Hala ere gutxi falta zitzaion ateratzeko. Omen. Hemen zurrumurrua da nagusi, radiomakuto.*

*Zigortuta nago. Hogei eguneko zigorra eman didate kide gaixoen alde borroka egiteagatik. Txaboloan jesarri naiz bizkarra komunaren eta ohearen arteko horman bermatuta... Aulkiak oso txarrak dira eta ez dago luze irauterik. Begiak altxatzean leihoko kristaletatik barrena —errezela berdeak alde banatan bilduta daude, bigiztaz eutsita— bederatzigarren moduluko eraikina dut parez pare. Eraikin guztiak berdin-berdinak dira, biluziak, karratuak, tarteka leihotxoak hagin-zulo hutsak bailiran. Ekialdera ematen du nire txaboloak. Oskar Wilderen Dorian Greyren erretratua irakurri dut. Aldika, begiak jasota, kristalak uzten didaten hormigoi-zatiari eta zeru-puskari erreparatu ohi diet. Bostak aldera bete-betean jotzen du eguzkiak eraikinean. Horizta, ia laranjakoloreko bihurtzen da, argitasunak piztuta, erabat sutu gabe. Minutu batzuk pasata, malba kolorea hartzen du, argia pittin bat urrunago eta hodeien islaren eraginez. Ondoren, berriz, urdin-griskara, teilatuen txapa gris urdinduna bezala, kolore hori nagusituz. Liburuaren kapituluak hostokatu ahala betiko krema-kolorea hartu du beste behin, eguzkia mendebalderantz ezkutaturik. Konturatu orduko patioan argiak piztu*

*dituzte, burezur zurbilak bailiran, eta iluntasunak irentsi du eraikina, arriskutsuenen modulua. Apenas ikusten da deus. (...)*

*Sekulako euri-jasak bota ditu egunotan. Gau eta egun zirri-zarra. Ez dugu patioan ibiltzerik izan. Aski ernegarria da euria espetxean. Erabat blokatuta geratzen zara. Virginia Woolfen Una habitación propia irakurri ondoren, Ramón Senderrekin hasi naiz. Arratsaldean pittin bat berandutu naiz ohean, siesta astuna izan baitut. Ez daukat katalana ikasteko gogorik. Egunotako bustialdiaren ondoren, berdetu dira soroak. Ilusio batek bizitza oso bat zutik iraun ahal du, eta azkenean ohartzen zara ilusio hura dela daukazun bakarra. Zer egin, ordea, ilusioa iraungitzen denean, erabat biluzik eta argal utzirik? (...)*

*Joseba Sarrionandiaren Moroak gara behelainoan? irakurriz nire umetako heroe batekin egin dut topo: Charles de Foucault eremita. Moro batek hil zuen, ustez haien ongizatea eta salbazioa baino nahi ez zuen gizon umila. Orain arte ez dut jakin touaregen hizkuntza eta poesia bildu zuela, eta horrek lehendik neukan haren soslaia handitu baino ez dit egin. Baina inork ez zidan azaldu ez eta ere frantses militarrekin iritsi zela desertura, eta haren iritziz, musulmanek kristau eta aldi berean frantses bilakatu behar zutela; hots ideologia kolonizatzailea zuela funtsean. Hori ez omen dago ezkutatzerik gizon ona, zintzoa izate hutsarekin. Pertsonak oro daukagula, alegia, geure alde iluna edo ifrentzua.(...)*

*Fukushimako zentral nuklearra lehertu da, lurrikara eta tsunamia eraginez. Muturka dabiltza nuklearren aldekoak eta kontrakoak (...) Giza eskubideen aldeko amorratuenek Bin Laden akabatu eta orain Libia bonbardatu nahi dute. ETAk armak ixildu dituen egun berean garbitu dute Gadaffi. Biolentzia zilegi omen da kasu honetan.*

# -I-

Mutiko polittaren historia nirea da, jakina. Heldu arteko ingurumariak xehetzen ditu, gerokoaren azalgarri-edo. Seminarioan idazten hasi nintzenean ezin igar nezakeen zaletasun hark espetxera eramango ninduenik. Ez da erabat horrela izan, baina badu zerikusirik. Eskolako lanak idazten hasi nintzen, beste edozein bezala, eta berehala ohartarazi zidaten irakasleek banuela ezpala, eta horrek animatu egin ninduen. Ez dut sekula gauza mardulik idatzi, ez naiz pasatuko literaturaren historiara. Eskolan agindutako deskribapen, narrazio eta saiakera laburrak ez ezik goiz hasi nintzen nire egunerokoa idazten. Zoritxarrez, koadereno-pila ederra beteta nuela, behin, auskalo zer haize-boladak jota, dena jaurti nuen zakarrontzira. Erruz egokitu zait bizitokia aldatzea, eta kokoteraino nengoen boligrafoz zirrimarratutako koaderno haiek denak garraiatzen. Beti izan dut arropa gutxi eta liburu asko, nire hezkuntza-garaian hala irakatsita, eta aipatutako koaderno haien eta liburuen artean, liburuak gordetzea hobetsi nuen beti, seguru asko oker, orain behintzat damu naiz; izan ere liburuak berriro eros daitezke, eta nire bizitzako lehen zertzelada, pasarte eta sentimenduak jasotzen zituen koaderno-sail hura betiko joan zen zaramara. Eskerrak gizakiok badugula ordenagailu zentral bat non irarrita geratzen diren gauza gehienak —modu aleatorioan selekzionatuta, hori bai—, bizipenak eta bizikizunak, sentimenduak eta gogo-nahiak. Batzuetan gure zoritxarrerako, ahazten saiatu arren hor baitaude betiko. Nolanahi ere bizi izana bizitua, norberaren ondarea da; ikasteko erabiliz gero, ongi etorria izango dena, eta bestela, urteak bihotzean egiten duten arrastoa salatzeko, beti hor. Bota nituen bota nire lehen testu baldar haiek, eta orain, heldutasunera iritsita, errezel berdez hornitutako ziegan idazten dut, lehen gazta-

roan ernetako idazle-senaz bizitzak sei hamarkadatan eman duenaz gogoeta egiteko asmoz.

Zer esanik ez, oso berandu hasi nintzen euskaraz idazten. Gure hezkuntza beti gaztelaniaz izan zen, euskara apenas izan zuen presentziarik bukaera arte, euskarak etxekoekin mintzatzeko balio zigun, asko jota, ez galtzeko zoria izan genuenoi. Gure etxeko bi osaba fraideek ia erabat galdu zuten ama-hizkuntza. Haiek bezala asko ikusi ditut, euskaldun sartu eta erdaldun bihurtuta etxera itzultzen edo bertan geratzen, maingu eta sarri penatuta. Norbait izateko, idazten saiatzeko, lan intelektuala egiteko gaztelania zen hizkuntz bakarra gure garaian. Klaretarren seminarioan euskaraz idaztea burutu ere ez zitzaigun egiten gure belaunaldiko gazteoi. Alferreko saioa zen, ez baikinen hiztun alfabetatuak, agrafoak ginen, mendeetan zehar gure arbasoen hizkuntza izan den bezalaxe. Esan dudan bezala nire ikaskide jatorriz euskaldunak ama hizkuntzan alingue bilakatu ziren gehienak. Ez zen nire kasua izan.

Eskola-jarduneko hizkuntzak ez ezik —latina, greziera, hebraiera eta italianoa— beste batzuk ere ikasten hasi ginenean, euskarak ez zuen kabidarik izan. Hobe frantsesa, ingelesa, alemana, etab. ikasten saiatzea. Horretara bultzatzen gintuzten eta halaxe egiten genuen, meneko gazte bihoztunak, obeditzeko heziak, gustura genbiltzanak kultur giro arroztu hartan. Gure ordena, Misiolari Klaretarrak, ez zen bereziki arduratsua izan euskarari dagokionez, ez behintzat gerora jakin dudanez frantziskotar, karmeldar eta abarren mailan. Egia esan nik ez nuen nozitu jazarpen esplizitu nabarmenik; ezkutuagoa zen gure artean gertatzen zena. Euskara ez zen beharrezkoa eta kitto. Hola antzematen nuen nik bederen garai hartan —1958-1973ra arte egon nintzen seminarioan, baina batik bat 1970erainoko urtealdia aipatu nahi dut hemen—. Gu ere ez ginen aparteko iraultzaileak,

ez horixe. Giroko umeak ginen, besterik gabe. Gizartearekin harremanik ez geneukan, eta parean egokitu zitzaigun apaiz euskaldun ia denak ez ziren sobera exijenteak izan gurekin alor hartan.

Hirurogeiko hamarkadaren bukaeran hasi ziren lur-zorutik ateratzen batzuk —Iruarrizaga, Agirre, Zabaleta, Mugertza, Etxebarria, Torrontegi, Barroeta, Zuloaga, Erezkano— urteetako zama astindu eta publikoki praktikatzen. Auskalo zenbat komeriarekin! Begiak ireki zitzaizkidanean, Vatikano II.aren haize-erauntsiari esker, gure artean euskaldun euskaltzale izandakoak bazirela ohartu nintzen, gorago azaldu dudanez eta nola edo hala haien oinordeko izaten saiatu nintzen. Nire mintzamena gordetzeko gai izan nintzenez —batere merituririk gabe, seguru asko— ospe berezia izan nuen beti, eta egiari zor, nire kide batzuen euskaratzean ere izan nuen arduratxoa.

Nolanahi ere, kazetari izatea zen nire ametsa, eta horretarako hizkuntza landu beharra neukan nahita nahi ez. Azkar konturatu nintzen fikziorako doainik ez nuela. Artikuluak, erreportajeak eta kronikak egiteko hobea nintzen, ordea, eta horri heldu nion gogotsu. Zaletasuna banuen, jakina, baina baimena falta zen. Ez zegoen ondo ikusita gutako inor arlo zibiletan jardutea: gure prestakuntza ia erabat erlijiosoa zen eta apaiz izatekotan, teologia, biblia, pastoralgintza edo morala ziren landu beharreko arloak. Filosofia bera teologiaren zerbitzari gisara ikasi genuen. Pedagogiari eta psikologiari ongi zeritzen gure nagusiek; lehenengoa, egokia zelako ikastetxeetan eta seminarioetan hezitzailetza ondo betetzeko; eta bigarrena, jendearen arimara iristeko, aitortzan eta gogo-zuzendaritzan trebe aritzeko. Baina kazetaritza? Oso gai *mundanoa* zen hura, arrisku bizikoa gutako edonorentzat, oso berandu arte ama kongregazioaren altzoan hezitako haurrontzat. Ikaskideen artean ez nuen nire helburu berbera zeukan inor ezagutzen, eta era horretara are zailagoa zen agintarien

baimena erdiestera iristea. Lehenengo meza eman arte, hau da, kongregazioarekin *erabat eta betiko* lotu arte, ez nuen aukerarik izan, eta orduan hogeita lau urte nituen.

## Lehenengo pauso baldarrak

Iruñeako Unibertsitatean egin nituen harrera-probak, OPUSenean. Ez nuen gogorik Euskal Herritik ateratzeko, eta nire nagusiek nahiago zuten hurbil edukitzea, era horretara ikasteaz gain gure *obraren* batean lagunduko nielakoan. Egokia zen horretarako Iruñea. OPUSeko unibertsitate-campusaren ertz-ertzean, goiko aldean, Pio XII.aren Etorbideko mutur batean, Klinika Unibertsitarioaren pareparean egoitza bikoitza genuen klaretarrok: Ikastetxea eta Egoitza unibertsitarioa, *Larraona* ospetsua (osabarekin bidaiatzen zuen kardinal berberaren izena zeramana, hain zuzen), garai hartan izen handikoa eta etorkizun oparoa izateko sortua, batik bat unibertsitarioen egoitzei zegokienez OPUSi monopolioa kendu zion lehena. Hori izan zen nire *destinoa*, horixe nagusiek prestatu zidaten plangintza. Urte haietan OPUSekoan ez ezik, soilik Bartzelonan eta La Lagunan ikasi ahal zen kazetaritza, eta Katalunia eta Kanariar Irlak urruti zeuden habiatik ateratako txori urduriarentzat. Beraz, Iruñea. Tira.

Orain asko aldatu dira gauzak, besteak beste seminaristek —geratzen diren apurrek— institutu eta unibertsitateetan ikasten dute, baina interesatzen zaigunerako, haien ikasketek balio zibila dute gaur egun, ikasketak homologatuta daudelako. Gure garaian seminariotan ikasten genuen, gure ikasketek ez zuten balio ofizialik seminariotik kanpo jarduteko edo jarraitzeko, eta hala hamahiru urteko ikastaldia PREUkoen pare geratzen zen, estatuaren eta Vatikanoaren arteko

akordioei esker konbalidatuak zirelarik. Beraz, kasurik onenean, Unibertsitatearen atarian geratzen zen. OPUSekoa, ordea, pribatua zen, berezko arauak zeuzkan, eta sarrera-proba egin beharra zegoen. Hara joan ginen. Egin nituen azterketak oso errazak iruditu zitzaizkidan eta gainditutzat eman nituen: kultura orokorra, erredakzio bat eta apenas beste ezer. Handik egun gutxira harriduraz jakin nuen ez nintzela gai instituzio hartan ikasteko. Erreklamatu nuen badaezpada. Alferrik.

—Zer gertatu zait?, galdetu nuen idazkaritzan.

—Ezer ez, ez duzu gainditu.

—Ikus dezaket azterketa?

—Ez; hemen ez dira azterketak erakusten.

Hortxe bukatu zen dena: OPUSekoek ez ninduten nahi. Nik ere ez haiek. Bingo!

Egia esan dezadan, poztu egin nintzen. Ordurako esnatuxe nenbilen eta ez ninduen zoriontsu egiten OPUSenean ikasi beharrak, gure seminarioa baino zaharkituagoa begitantzen zitzaidan, eraikin neoklasiko hartan hain jende moñoño eta santujaleekin. Beraz, Madrilera joateko baimena eskuratu nuen. Complutenseak Kazetaritza Fakultatea ireki berria zuen, eta Madrilen komentuetxe asko geneuzkan bertan bizitzeko, munduarekin kontaktua egin eta bertara erretiratzeko. Ez zen aukera txarra.

Euskal Herriko klaretarrok pisu bat geneukan Madrilen, Toledo kalean, San Isidro katedralaren aurrean. Etxebizitza zabala zen, zahar

samarra eta iluna ere bai, baina nire gogara egiten nituen sartu-irtenak eta erabateko askatasuna zeukan estudiatzera etorritako gazte ameslari inozo hark, nik alegia. Sei lagun ginen batera: bi apaiz beterano: Urkidi eta Arteta, *hermano* bat: Manuel Gonzalez, etxeko lanak egiten zituena; psikologia ikasten ziharduen apaiz gazte bilbotarra: Tamayo; beste bat, Campos, margolaria eta artista trebea (zertan zebilen ez dakit) eta ni neu. Luxua eta erosotasuna ezagutzen ez nituenez, ez nituen gutiziatzen, eta beraz ondo baino hobeto sentitu nintzen. Gela txiki-estua baino ez neukan —armairua, ohea, mahaia eta aulkia—. San Bruno kalera ematen zuenez, argirik ez zen sartzen hartara, beraz ate-leihoak beti itxita edukitzen nituen, eta bonbila piztuta, beharrezko ezer ez nuen ments: janaria, jantzia (sotana aspaldian neukan esekia ate atzeko iltze batean), esku-diru apurra eta liburuak erosteko behar adina. Elkarte hartan neukan lan-konpromiso bakarra txikia zen: meza moja-komentu zein ikastetxeren batean edo bestean, eta igande-arratsalde gutxi batzuetan —beteranoek ezin bazuten— *funtzioa* euren kapilautzetan. Di-da batean bete, aurpegi alaia erakutsi, mojatxoekin zintzo eta apal jokatu eta kitto, nire zereginetara. Meza eman ondoren gosaria irabazita neukan, antza, mojatxo abegikorren batek zerbitzatua eta harekin kalakan, eta arratsaldeko funtzioa amaitu ondoren —*tantum ergo sakramentum*, kustodia gora eta behera, esker-eskuin intsentsu-ke artean, gazte estudiantea urrezko hariz apaindutako kasulla soinean, Argüelles aldeko komentu hipertradizionaleko mojatxoei bizkar emandako posizioan—, eskupekoa eta diosalak —aita Timoteo kanpoan da, barkatu, gaur ni bidali naute, hurrengoan bera etorriko zaizue, lasai, aste ona pasa, agur, agur...

Halaxe heldu nintzen Madrilera printzipioz lau-bost urte egiteko —kazetaritza-ikasketa osoak, alegia, egiteko—, baina ez nuen hamabi hilabeteko urtebete egin bertan. Lehen ikasturtea osatuta bueltan nintzen Euskal Herrian ostera.

Urte arraro samarra izan zen niretzat 1973a. Eskola-hasiera ere halakoxea izan zen, arraro samarra. Hezkuntzako ministro bati —Julio González izan zitekeen— otu zitzaion ikasturteak urtarriletik irailera artekoak izango zirela aurrerantzean. Beraz, gurea urtarrilean hasi zen bai, baina bukatu ekainean bukatu zen, norbait ohartu zelako epe hura ez zela egokiena ikasturteak ondo gauzatzeko, eta berandu baino lehen aurreko sistemara itzultzea ebatzi zuten. Horrela bada, ikasturte labur-laburra izan zen nire kazetaritzako lehena.

Laburra bezain intentsoa inondik ere. Niretzat ia dena zen berria, aldi berean dena nahi nuen irentsi, Fakultate barruko giro nahasia eta irakasleen jakinduria. Hogeita bost urteko gaztea nintzen, ikaskideak baino hagitzez helduagoa, formakuntzaz ez nenbilen oso txarto haien aldean eta ikasteko gogoa eta diziplina ez nituen ments. Egia esateko, ez zitzaidan zaila iruditzen han ematen zutena, berri-berria izan arren gehiena. Praktikak ziren eskasak, ezerezak ez esatearren. Adibidez, ikus–entzunezkoen gaian TVEko kamerografo bat etorri ohi zen, planoak eta antzekoak hartzera —oso oker ez banago Vigón zuen abizena—, baina ez genuen sekula kamera bat ikusi. Ia hamarkada bat geroago UEUn erabili nuen lehen aldiz zine-kamera bat, Iñaki Beobidek ekarrita. Arbelean margotzen zituen Vigónek kameraren mugimenduak eta hitzez azaltzen haren ahalmen misteriotsuak: eta guk, txintxo-txintxo kopiatu eta aurrera. Berdin gertatzen zen argazkigintzari dagokionez. Hala ere ez ginen kexu: hartu, irentsi eta bota. Horixe zen sistema. Ezin esan daiteke oso sistema pedagogiko aurreratu eta efektiboa zenik.

Soilik Idazkuntako irakasleak jartzen zizkugun etxeko lanak. Gaitz erdi. Castillo-Puche zuen izena, nobelagile ezaguna omen zen Espainiako letretan, baina nik ez nuen haren berri. Norbaitek gogoratzen al du nolakoa zen Buffalo Bill?, bada antzekoa: adats luzeak, jada

zurituak, okotsean bizar luzanga, eta betaurreko borobilak —haiek Valle Inclán, John Lennon edo Troskiren antz handiagoa ematen zioten—. Pistolarik ez zeukan, noski. Oso tipo alaia eta zirtolaria zen, eta atseginez ematen genituen haren klase-orduak. Ongi ez dakit zergatik, begi onez hartu ninduen. Eskatu bezala egin nion lanen bat itzelean gustatu zitzaion nonbait, eta orduz geroztik nire izena baino ez zeukan mihi-puntan adibide positiboa eman nahi zuenean. Asko ginen taldean, ehundik gora ikasle, eta broma batzuk egiteko parada eman zuen, nire lotsarako, irakasle haren fijazioak. Ez dakit zer-nolakoa izan zen nire lehen lan hura, ideia zipitzik ez, baina nago nire abizenak erakarri zuela gehiago, Barojarekin lotuz; Don Pioren mireslea baitzen.

Asko laburtuz, burutu nituen azterketa partzialak eta azkeneko proba. Egundoko kalifikazioak atera nituen, ni ere harrituta utziz: bost matrikula! Gela barruan neukan arazo bakarra —osasunari begira kaltegarria izan zitekeena bestalde— hango kea zen. Kristo guztiak erretzen zuen, irakasleak ere bai eta neuk ere bai sarritan. Gelan pittin bat berandu sartuz gero ke-lainozko errezel sendoren atzean ezkutatzen ziren aurpegiak oro. Ez zen giro, baina huraxe zen ohitura. Ordurako pittin bat ezagunak nituen neskak, Frantziako eta Donostiako garaietatik, ondo konpontzen nintzen euren artean, errespetuzkoa zen nire jokabidea, bihotz garbikoa nintzen.

Ikasketak aurrera egin ahala koadrila ederra osatu genuen: Silva, Marisa, Satur, Nieves, aldikako beste norbaitzuk eta ni. Bi euskaldun ere baziren —Goiburu goierritarra eta Susperregi hondarribiarra— baina ez ziren gurekin ibiltzen. Silva eta Satur apaizak ziren, neroni bezalaxe; Nieves Silvarekin ezkondu zen hurrengo urtean, eta Marisa nire atzetik zebilen ni konturatu baino dezente lehenagotik: neska polita zen, jatorri euskaldunekoa, ilegorria. Mutila utzi eta

nireganako interesa erakutsi zidanean, ahalik eta samurren azaldu nion zer zegoen. Berrogei urtez egon da nire lepotik zintzilik berak oparitutako Indaloa, "nire oroimenez", hautsi den arte. Nolanahi ere koadrila trinkoa osatzen genuen denetarako, eskolako oharrak trukatzeko eta "hortik zehar" ibiltzeko: Fakultatez Fakultate tabernak bisitatzen, kuxkuxeoan, eta greba-egunetan. Urte hura gatazkatsua izan zen, eskola-egun baino lanuzte gehiago izan zituen, eta egia esan abailgarria zen ikasteko guraria zeukan honentzat. Edozein moduz gizartean eragiteko hezia izan nintzen, Euskal Herrian ikusita neukan nola joka zitekeen kalean justiziazko gauzetan, eta ez nengoen atzera egiteko asanbladak amaituta Fakultateko atarian oihuka hasten ginenean. Polizia, *grisak*, etorri ohi ziren, zaldi eta guzti, sekulako zigorkadak banatzen abereen gainetik. Onik libratu nintzen. Marisak ez zuen batere atsegin ni nabarmentzerik, eta erreguka etortzen zitzaidan. "Lasai politt hori, ez da ezer gertatuko", esanaz sosegatzen nuen.

Laket nuen koadrila, zinez; eta hagitzez gehiago estimatzen nuen kaleko giroa komentukoa baino, oso-oso ikusita baineukan, ume-umetatik, fraideon arteko elkarbizitza. Nolanahi ere gehienetan bakarrik ibili ohi nintzen eskola-girotik at. Adibidez biziki atsegina nuen arratsaldeetan zinemara joatea, *arte y ensayo*ko saioetara. Eta beti nire kasara ibili ohi nintzen, filmak dastatzen, arte-kezkak eraginda baino gehiago bizitza modernoko kezkak han jabetuko nintzelakoan edonon baino hobeto; aspaldiko zaletasuna nuen zinemagintza, eta neurri batean halaxe zen. Apaiz eginda non sartzen nintzen jakin nahi nuen, jakin.

Zinemari lotuta idatzi nituen nire euskarazko lehen artikuluak, *Zeruko Argia*rako. Pare bat besterik ez, eta galduta dauzkat. Bueltaka neukan nire baitan zinemari buruz zerbait egin behar zela euskaraz, eta

hala *El Mensajero* argitaletxeari proposatu nion itzul nezakeela Pedro Miguel Lamet eta beste jesuita batzuek idatzitako liburu pedagogiko bat. Erantzun zidaten itzulpenak baino gehiago lan originalak behar zituztela. Arrazoi osoz. Gainera garai hartan ni ez nintzatekeen itzultzaile ona izango, euskara jakitea, txukun moldatzea eta alfabetatu berria izatea ez baita aski itzulpen kurioso bat burutzeko. Nola-halako trebetasuna erdietsi dut urteekin, baina orduan gogoa besterik ez neukan eta itzulpengintza-trebetasunez biluzi nengoen.

Etorri zen ekaina eta, esan bezala beste ministro bat izendatuta, presaka bukatu behar izan genuen ikasturtea. Beraz, Gandiagarena baino pixka bat laburragoa izan zen nire egonaldia Madrilen, seguru aski ez hain emankorra. Eri amaitu nuen. Ariman larriki zaurituta. Inoiz baino urduriago, galduta eta noraezean, nire buruarekin desados, handik alde egiteko eskaka amaitu nuen ikasturtea. Halaxe idatzi nien Euskal Herriko agintariei: “Atera nazazue hemendik, koka nazazue gura duzuen tokian; nik ez dut honetarako balio, alferrik ari zarete dirua nirekin xahutzen, ez naiz gauza, ez naiz gauza”. Inork ez zuen deus ulertzen. Nik-neuk ere ez.

Kalifikazioak ezagutu aurretik bidali nien eskutitza, udaberriarekin batera hasi baitzen nire barrua larrimintzen, eta haiek ezagutu nituenean —nire bizitzan inoiz, ez lehen eta ez gero, izan ditudan onenak—ez nuen aburua aldatu. Zer gertatu zitzaidan ez dakit ziur, baina orduz geroztik berrogei urte igaro direlarik —bere akats eta bertuteekin— esan dezaket, beharbada nire betiko aldartea agertzen hasia zela, alegia, zerbait egiten ari naizenean beste zerbait, errotik ezberdina, gutiziatzen dudala, eta deseroso sentitzen naizela, Sisifo madarikatuaren gisara, ostera zerotik hastera derrigortuta. Edo beste modu batez adieraziz, beharbada ez ditudala ontzi guztiak erretzen —ez guztiz eta ez den-denak—, nire baitan bizi den ume

desorekatuan baino hagitzez seguruago agertzen naizela besteen begietara azken buru. Atzean utzitako unibertsoa nire begi mirestuen aurrean ageri dena baino askozaz eraginkorragoa begitantzen zaidala, muturreraino, Finisterreraino alegia, nabigatzea eragozten didana. Auskalo. Ez naiz Freud, ez naiz Lacan; gizaki bat baino ez, kontraesanez betea.

Orduko arrazoiak zehatzago ekartzeko, esan dezadan arrotz sentitzen hasi nintzela Madrilen. Arrotz Euskal Herrian ez nengoelako, eta hainbat kostata errekuperatu nuen neure hizkuntzan ez beste batean mintzo behar nintzelako lau-bost urtean. Arrotz koadrilan, gustura ibili arren. Denek zekiten hasiera-hasieratik apaiz-fraidea nintzela, neronek esanda, hala ere ezin nuen gazte haien bizitzan era berean parte hartu, ez nintzen haietako bat. Ni besteen alde zerbait egiteko —are, bizitza emateko— prestatu nintzen, horretarako egin nintzen apaiz, eta ez nuen xede hura betetzeko betarik igartzen. Zertan nenbilen ni bizitza unibertsitarioan beste edonor bezala?, zein zen nire egitekoa han? Hori al zen herri xehe, pobretu eta zapalduaren alde jartzea? Adibidez oso erridikulu sentitzen nintzen eta lekuz kanpo —ni beti lekuz kanpo, tokia ezin harturik— auzoren batean jaiak zirela-eta gauean koadrilan elkarrekin ateratzen ginenean — larunbatetan atera ohi ginen eta goizaldean itzuli, maiz serenoari beheko atetzarra irekitzeko eskatuz.

Biharamunean, igandea izaki, goiz irten behar nintzen moja-komenturen batean meza ematera. Hura sakratua zen eta ez nuen inoiz huts egin. Patrikan eraman ohi nituen hitzalditxoa osatzeko oharrak, eta gainerakoak talka-autoetan edo garagardoa hartzen lasai ibiltzen ziren bitartean nik patrikako oharretan neukan gogoa, igandeko ebanjelioan. Mojatxoek merezi zuten nire arreta, ez nien huts egingo, nahiz eta banekien zaharrenak marmarka hasten zirela sarri kapera

bazterrean nire hitzen doinura, ausartegiak zirelako-edo. Gazteak, aldiz, aitortzera hurbiltzen ziren apaiz gaztearen ondora, sakristiara. Ia bizitza osoan, gazte-gaztetatik, amestutako kazetaritza-ikasketak aitzakia gisa begitantzen zitzaizkidan une hartan, burges ttipi ahoberoaren bizitza-molde erosoa. Inork ez zidan erakutsi Madrilen ere badagoela non saiatua —Vallecas, Entrevías, etab., etab.— gutxienez, aldika nahi izanez gero; ni-neu ere ez nintzen gauza izan hartaz jabetzeko, eta nire Euskal Herriko nagusiek azkar bilatu zuten soluzioa etxera itzularazteko, nik eskatuta. Inork ez zidan gogoratu zertarako ari nintzen ikasten, komunikazioan sakontzea zela nire geroko lanaren muina, denbora behar izaten dela, eta jarraitzeko. Ezin dela amore eman.

Hurrengo ikasturtean Nafarroan kokatu ninduten agintariek, Zizur Gutian, Verbo Divino ikastetxearen bigarren solairuan, San Fermin ikastolaren gain-gainean (garai hartan Gabriel Urralburu bizi zen han, fraide, eta gitarra jotzen zuen Arbeloak Etxabakoizeko elizan meza ematen zuenean). *Gure* seminarista nagusien ardura eman zidaten: ni ere *ikasle* bainintzen neurri batean.

Madrilen nozituriko desegokitasun iragankor hark ez ninduen kazetaritza ikasten jarraitzeko gogotik etsitzera bultzatu. Arazoa zen non ikasi. Non biziko nintzen argituta, OPUSera bueltatzea zen aukera bakarra, baina bigarren aldiz errefusatu ninduten. Alferrik izan zen Complutensen ateratako kalifikazioak erakustea. Beste *sarrera-azterketa* egitera behartu eta ostera "No Apto" jo ninduten. Komeriak. Temaren temaz, akatsa non ote zegoen galdezka iritsi nintzen Fakultateko Idazkaritzara. Nire txandara, azterketa ikusi ote nezakeen eskatu nuen. Kalifikazio guztiak ez zeuzkala erantzun zidan Esparza izeneko idazkari herren bizardunak, karpetan zeukan bakarra 7 bat zela, idazkuntzari zegokiona —karpetaren tapa erdizka altxatuz esan

zidan hura—, baina nolanahi ere den ez zegoela zereginik, kalifikaio orokorra "No Apto" zela. Okasiorako entseatuta neukan purrustada bota nion: alegia, uste izan nuela hura unibertsitate serio eta justua zela, zoritxarrez oker nengoela, gezurretan ari zela nirekin, agian klaretarra nintzelako soilik, Larraonako apaiz bat, eta beraz arazo ideologiko hutsak tarteko zapuzten nindutela. Ez zuela merezi han ikastea. Altxatu eta agur esan gabe alde egin nuen, hango ateak niretzat betiko zarratuz. Suerte txarragoa izan zuen nire beste kide batek, zeinak Filosofia ikasteko sarrera lortu zuen arren, libre modura ikasi behar izan zuen karrera osoa eta, azken urtean, apaiza eta teologian lizentziatua izan arren, erlijioa suspenditu zioten apaizei zegokien janzkerarik gabe ibiltzen zelako, bertako zuzendari espiritualak esan zionez. Misiolari dabil oraindik Boliviako altiplanoan...

Ezustekorik ez, hala ere. Ohartarazita nentorren Madrildik. Izan ere orduko irakasleen artean bazegoen bat, Angel de Benito, denetan ospetsuena garai hartan, Obrako kidea izana, zeinak, Iruñekoan sartzeko nire aukerei buruz galde egitera joan nintzaionean esan baitzidan: "Jainkoak lagun zaitzala".

## Fakultatetik erredakzio-gelara

Hala hiruzpalau urte itxaron behar izan nuen kazetaritza-ikasketei berrekiteko. Noizbait UPVn ireki zuten Fakultatea, eta hantxe, Leioako campusean, amaitu nuen ikastaldia, modu oso prekarioan. Izan ere, hasiera batean, Leioako Zentroa Bartzelonako Fakultatearen Unitate Ordezkoa zen; beraz, ikasketa-planak hangoek onesten zituzten, eta azken urteko azterketak Bellaterran egin behar izan genituen. Konplizitatea handia zegoen Kataluniako eta Euskal Herriko irakasleen artean, eta gauzak aski ongi joan ziren. Katalanek oso

begi onez ikusi zuten han ikasten zuten euskaldunen ekimena Euskal Herrian Fakultate bat sortzeko beren gidaritzapean, eta ez zuten funtsezko eragozpenik jarri. Niretzat oso-oso erosoak izan ziren Leioan egindako lau urteak, besteak beste gelan hamabi lagun eskas biltzen ginelako eta dena —ordutegiak, gastuak, irakasleen soldata, zuzendaritza bera, baliabideak, etab.— hasiera guztietako elkarlan gozoan gauzatzen zelako, proiektu komun bat sortzen aritzeak ematen duen ilusioak eraginda. Urteak aurrera egin ahala dena arautu, instituzioaren onurak eta galbideak nozitu eta azkenean dena hankaz gora ipini zen... Aurrerago itzuliko naiz horretara.

Urte haietan erdi ikasle, erdi langile izan nintzen, garai hartan oso jokabide arrunta, ondo ikusia eta gainera posible zena askorentzat. Getxoko Andra Mari auzoan bizi nintzen, beste lauzpabost kideekin, Askartza ikastetxeari fraide pobreontzat desegoki iritzi eta bizitza xumeagoa egin aldera egindako apustu bati esker. Auzoetxe batean bizi ginen, neroni nintzen taldeburu, eta San Nikolas Ikastolan lan egiten nuen, euskara eta erlijioa irakatsita bizitzeko adina irabaziz. Asegarria zen niretzat dinamika hura: goizean ikasle eta arratsaldean irakasle. Gainera, etxean beste era bateko komunitatea sortzeko ahalegina partekatzen genuen denok, uste izanik fraideen artean ere "beste mundu bat posible" zela.

Amaitu nituen ikasketak, eta kazetari izan nahi nuen inondik ere. Nire zorionerako ia-ia ahaleginik egin gabe hartu nuen lanpostua. Jose Felix Azurmendi, artean *Egine*ko zuzendaria, zen gure irakasleetako bat, Semiotikakoa. Azken eskola-egunean, agurtzean, esan nion "Gogoan eduki lagunak". "Eskatu gaur bertan", erantzun zidan, eskaileretan gora galduz. Uda hartan bertan Hernaniko egoitzan hasi nintzen, erredakzio nagusian informazioa euskaraz egiten eta, gehienetan, besteen euskarazko lanak zuzentzen. Xalbador Garmendia

nuen sailburu, eta Joxean Agirre idazlea sailkide bakar. Udaroa zenez Tolosan bizi nintzen, amarenean. Egunero hartzen nuen trena Hernaniko apeaderoraino, eta handik oinez sartzen nintzen Eziagoko poligonoan, kasualitatez lankideren batek autostopean hartu ezean. Atsegin nuen lan hura; batetik kazetaritzan praktikak egiten ari nintzelako, eta bestetik, nire gustuko hedabidean hartu nindutelako. Ametsa gauzatzen ari zen. Are gehiago uda pasata Bilboko erredakzioan lan egin nahi ote nuen galdetu zidatenean, soldatapean eta kontratu finkoz. Santutxun etxea erosi eta ezkontzekotan nengoen ordurako. Zalantzarik gabe onartu nuen, noski, nire baitan pentsatuz, ahal badut ez naiz hemendik mugituko. Pentsatu bai...

Gozo-gozo aritu nintzen Bilboko erredakzio-egoitzan, Juan Mari Arregi langile porrokatuaren zuzendaritzapean. Oso oker ez banago Arregi izan zen orain ohikoa den manifestazioetako jende-kopurua zehazki zenbatzen hasi zen lehena... Dozena bat lagun ginen erredaktoreak, argazkilariak, publizistak, banatzaileak eta telefonistak zenbatuz. Garai hartan futbol-partidak egiten ziren Bilboko beste medioetako kazetari-taldeen aurka. Erredakzio-gelako ke zikinaz aparte —nik ere erretzen nuen garai hartan— giro txukuna genuen gure artean, baina XX. mendeko laurogeigarren hamarkada izan arren historiaurrean geunden. Idazmakinatik ordenagailuetara salto egitea ezagutu nuen. Ez zait ahaztuko Madrilera egindako bidaia ordenagailuak aurrez aurre ikusi eta makina haiekiko beldur atabikoa kentzeko bidali baikintuen enpresak. Ordura arte gure teknologia bakarra idazmakinaz idatzi eta fax bidez bidaltzea zen. Polliki moldatu ginen sistema berrira, hala ere nik ez nuen ezagutu automaketazioa eta antzeko *delicatessen*ak, zer esanik ez Internet. Gure garaian usainik ere ez...

Nire lana bereziki erredakzio-lana zen, zorioneko prentsaurrekoak eta zenbait elkarrizketa izan ezik. Lotsa pixka bat ematen dit orain kontatzeak, baina nire lehenengo elkarrizketa, enkarguz, Bibi Andersoni egi nion, Ercilla hotelean, 28 urte bete zituen egunean... Gero bestelako asko egin nituen, politikoei, kulturako jendeari, etab. Baina lehena iltzatuta geratzen da. Gehien txalotu zidatena Don Klaudio Gallastegi San Antongo abade mitikoari Gorlizko zaharretxean egindakoa izan zen. Eta egin zidaten ustezko lausengurik handiena hauxe, ezker abertzaleko buruzagi baten ahotik: “Zerbait egin nahi baduzu zoaz Zalakagana, hark zerorrek baino hobeto emango du aditzera benetan esan nahi duzuna”.

Une gogorrak ere bizi genituen, adibidez Kirruli, Joxe Ramon Goikoetxea, Xanti Brouard eta Xabier Galdeanoren heriotza-kronikak egitea egokitu zitzaidan, Erandioko txalet baten sotoan harrapatu zuten armategiari buruzkoa ere bai. Hala ere gogorrenetan gogorrena niretzat Mario Alvarezi buruzkoa suertatu zen. Barrikara bidali ninduen sailburuak, hiletaren berri emateko. Ez ditut ahaztekoak Guardia Zibilak Plentzian gorpua jendeari lapurtu eta hilerrirako bidean gertatutakoak: jendearen ulu eta garrasiak ditut burmuinean irarrita, bailaran gora haizeak zekartzanak. Kronika epikoa idatzi nuen nonbait: ”Nik ez nukeen argitaratuko”, esan zidan Arregik handik aldi batera. Argitaratu zutenez, beste norbaiti gustatuko zitzaion.

Euskaraz idazten nuen ahal nuen guztia, Etxepare ezizenez, baina berehala konturatu nintzen euskara bigarren mailako hizkuntza bilakatzen dela ezinbestean hedabide elebidunetan. Arazo estrukturala da. Laurogeigarren hamarkadako lehen urteez ari naiz, eta ordurako puri-purian zegoen AEKren ahalegin saiatua herritarrak euskaldundu eta alfabetatzeko, eta hedabideei dagokienez, *ARGIA*k, zeruta-

suna baztertuz, abiatua zuen euskal prentsa antolatzeko *ibilbide luzea*. Inozo-inozo uste izan nuen *gure egunkariak* gero eta gehiago argitaratuko zuela *denborarekin* euskaraz, erabat euskaldundu arte, baina luze gabe ohartu nintzen borondate on guztiarekin ahalegin hutsala zela, eta beraz muga hori onartu beharra zegoela erotu ezean. Kontraesan lazgarri hori egokitu zitzaidan: euskara hutsezko hedabideen aldeko misiolari bihurtu nintzen —zenbat hitzaldi, mahai-inguru, jardunaldi, eztabaida, etab.—, baina hedabide elebidunean jarduten nuen, ezinean eta, arlo horretan, etsi-punttu batek jota ere bai.

Ordurako ezagun nituen nire beste muga batzuk, alegia kazetaritzan ez dela nahikoa txukun idaztea; zerbaitean aditu izan behar dela, gutxienez arlo batean. Unibertsitateak ez zigun hori eman, "kazetaria denetatik pixka bat eta ezertan asko ez dakien norbait" dela dioen aforismoa on eginez. Zeukan egituragatik, Bilboko erredakzioan ez nuen aukerarik ezertan espezializatzeko. Ikasle nintzen garaian pentsatu izan nuen komunikazioa bera zela niri hobekien zetorkidan arloa baina horretarako espezializazioa behar zen, Euskal Herritik kanpo, zeren UPVn orduan ez zegoen horretarako gaitasunik ez bitartekorik. Kanadara joateko beka eskaini zidaten, baina uko egin nion. Euskal Herrian zegoen nire tokia, 33 urte banituen eta emaitzak ematen hasteko garaia zen. Beraz, praktikak erakutsiko zidan bidea.

Gutxiegi iraun nuen zeregin hartan etekin nahikorik ateratzeko. Hiru elementu batu ziren *Egin*en neukan kazetari-lan eta kontratua bertan behera uzteko: gaixotasun arraro bat diagnostikatu zidaten, gaixotasun sistemikoa, geroztik betiko nirekin daramadana: biriketako sarkoidosia. Neurriz kanpo nekatzen nintzela-eta atsedenaldian nengoelarik, Andaluzia arrapaladan utzi eta Basurtuko ospitalean amaitu nuen, erabat jota, mediku-taldeak zer neukan ez zekiela. Adiskideak *karramarroa* ote neukan pentsatzen hasita zeuden. Ebakuntza

egin ondoren biriketako sarkoidosia zela ebatzi zuten eta estresik gabeko lanean hasteko gomendatu zidaten. Bigarren elementua zen UPVko Kazetaritza Fakultatetik deika ari zitzaizkidala lagunak bertara irakasle joateko. Zaila zen niretzat erabaki hura hartzea, alabaina unibertsitatean hastea erabaki nuen, zuzeneko kazetaritza baztertu eta kazetarigai euskaldunei ofizioa irakasten hasteko. Gutiziatutako alorrean arituko nintzen segurantzak kontsolatzen ninduen. Edozein moduz elementu erabakigarriena, azken bultzada beste bat izan zen, egunkari barruko gatazkatxoa, barne-barnekoa, Bilboko egoitzara mugatua, edonori gerta ahal zaiona, baina nire kasuan, arestian aipatutako bi elementuekin uztartuta, UPVra eraman ninduena. Perspektibaz begiratuta txikikeria dirudi, nolabait esateko arazo domestikoa. Lankide bat nire zereginean desleialki sartzen saiatzen ari zen, batik bat informazio politikoari zegokionez, eta informazio lokala egitera baztertu nahi ninduten —une hartan modan jarri zen arloa, dena esateko—. Gaztea nintzen, burgoia, eta ezetz esan nuen: *"Medikuak lan estresagarria jo du kazetaritza niretzat, badut beste lan bat Kazetaritza Fakultatean; beraz, banoa. Agur"*. Nago inor ez zela ohartu benetan gertatzen ari zenaz. Nik ere ez nuen azaldu, ez baitut gustuko lankideekin ika-mikan hastea. Eta irakasle hasi nintzen Leioan.

## Herria 2000 Eliza, mirariak badira

*Egin*en lan egiten nuen bitartean banuen kazetaritzako beste alor bat, niretzat kuttuna, ia-ia bizitza osoan mantendu dudana: *Herria 2000 Eliza*. Aldizkari horretan egi(te)n dut kazetaritza-lanik gehiena, askeena eta zalantzarik gabe iraunkorrena. Lankide xume sartu nintzen, 1980ko lehen urteetan Joseba Goñi zenak fitxatuta, eta erredakzio-buru izan naiz urte luzez, baita kartzela urteotan ere. Nire

kideek, eskuzabaltasun osoz, zuzendaritzan mantendu naute, nire atxiloketa lotsagabea eskura zeukaten modura gaitzetsiz.

*Herria 2000 Eliza* mirari bat da, ez zeruarena, bere eliztartasunak aditzera emango lukeen lez, baizik militantziarena. Militantzia hutsean oinarritu da beti aldizkaria, eta laurogei, laurogeita hamarreko hamarkadako aldizkari guzti-guztien iraunkortasuna aise gaindituz bere mailako bakarra izatea lortu du. Zoritxarrez, noski, beste guztiak, langile eta guzti, pikutara joan zirela esan nahi baitu horrek. Merkatu-legeak daude tartean, bistan da, baina merkatu-lege horiek ez gaituzte itoarazi, ez dute *Herria 2000 Eliza* isildu. Inoiz edo behin txantxa-giroan aitortu dugu gure merkatu-lege bakarra zein den: inork ez kobratu, inori ez ordaindu; lana doan. Horrela ez dago bizitzerik, jakina. Ez da hedabide bat kalean jartzeko modua. Gureak, ordea, holaxe iraun du. Inorentzat ez da izan bizimodua ateratzeko era, baina aldizkaria hor dago. Ez dugu publizitaterik izan, eman ez digutelako. Soilik Jose Manuel Balentziaga *Balentxi* bizi zenean, eta seguru aski haren egoskortasuna ez pairatzeko, Gipuzkoako Kutxak ematen zigun zerbait; gero, betiko itxi ziguten txorrota. Beraz, harpidetza izan da gure diru-iturri bakarra, inprentari eta maketatzaileei ordaintzeko, horretan ez baikara geure buru izan. Harpidetza xumea, guretzat aski ordea.

Euskal Herriko Kristau Elkarte Herritarrei eta Euskal Herriko Apaizen Koordinakundeari zor zaie aldizkari hori, Felix Placerrek idatzitako *Creer en Euskal Herria* (H2000E, 1998) liburu mardulean ondo azalduta dator dena. Beti bezala, hasierako urteak izan ziren emankorrenak, haietan mamitu baitziren goian aipatutako elkarteak ez ezik aldizkaria bera; eta nolabait aipatzekotan Joseba Goñi Altzueta (G.B) aipatu behar da bultzatzaile eta eragile nagusitzat. Haren antolatzeko ahalmena paregabea izan da.

Niri dagokidanez, Getxoko Andra Mari auzoan bizi nintzelarik etorri zitzaidan Goñi etxera nire bila 1981ean. Hasieran *Euskadi la paz es posible* liburu koralerako kolaborazioa eskatu zidan eta, gero, emeki-emeki aldizkariaren dinamikan sartu ninduen bere proiektuetara erakartzeko zeukan maixutasuna erabiliz. Gustura aritu izan naiz beti, zer esanik ez. Bistan da garapen bat izan duela, laurogeigarren hamarkadan askoz ere nabarmenagoa zen Askapen Teologiako jendearen presentzia, nazioartekoa —Ertamerikako *gerrillen* urteak ziren—, bereziki Hegoamerikakoa nahiz estatu espainolekoa eta EHkoa baztertu gabe. Denborarekin teologia-molde hori higatzen eta iraultzak gesaltzen edota konpontzen joan diren neurrian —instituzioak irabazi ondoren— askoz ere gehiago kontzentratu da Euskal Herrian, horren askapen-prozesuan, nolabait kristau-ikuspegi heterodoxoari (edo ortodoxoenari?) eutsiz, baina bere dimentsio egiazkoan, azken finean errealagoan, utziz, orearen eta legamiaren parabolak iragarri bezala. Alde batetik aldizkari *politikoa* garela esan digute, begiak ezker abertzalearentzat baizik ez ditugula, ondorioz ETAren eremuan kokatuz; eta bestetik, politikan interesatuek *keru elizkoia* egotzi digute, esan nahirik bezala horixe dela gure muga, aurrera jo eta benetan konprometitzeko ezinaren aztarna edo holako zerbait. 2007an 18/98ko epaiketa iraingarrian zerau bota zuen batere lotsarik gabe epailearen aurrean "Tango" ezizeneko *madero* batek: "Artikulu eta agiri batzuk *Zutabe*n agertu baino lehen *H2000E*n agertu ohi dira". Gezurra. Datei erreparatzea besterik ez dago. Aurrerago, gure kristau-tankera eta produktuaren ospea zoruraino jaitsiz, honela erantzun zion epaileari gurea zer aldizkari-mota zen galdetu zionean: "Apaiz eta kristauen aldizkaria da, nahiz eta hauen kristautasuna hutsaren hurrengoa den. Nolanahi ere bizpahiru ale baino ez dituzte saltzen". Hitz borobilegiak gure ezereza adierazteko, eta aldi berean gure irismena aldarrikatzeko! Eliza instituzionalak ere ez digu sekula tratu onik eman, eta gure ahotsa isiltzen saiatu da.

Setien Apezpiku ohiak, adibidez, Gipuzkoako Elizbarrutiko apaizei parrokietan harpidetza egitea debekatu zien.

Tira, nire lehentasunetako bat izan da *Herria 2000 Eliza* ateratzen laguntzea, Vatikano II.aren ildoan hain gartsuki bizitzen saiatu den kristau-korronte berritzaileak ahotsa izan dezan, eta Euskal Herriaren askapen-prozesuan bere eragina txukun betetzeko nire ekarpena eta gogoa jarriz. Bidebatez nire kazetari-sena ase dut, distirarik gabea izanik ere. Zoritxarrez ez zaio segidarik ikusten gure ahaleginari —ez Kristau Elkarte Herritarrei ez Apaizen Koordinakundeari—, hala ere badakigu gure egitekoa zein den, alea eskuzabal ereitea, inoiz, inon fruiturik emango duelakoan. Gero gerokoak.

Ehunka artikulu, editorial, erreportaje, elkarrizketa, iruzkin etab. idatzi ditut urte horietan, eta harrigarriena da hedabide batean egin ahal diren zeregin gehientsuenetan aritu izan naizela tarte batzuetan (antolatzaile, editore, idazle, maketatzaile eta kudeatzaile), nire golkorako esperientzia dezente metatuz. Euskarari dagokionez, zer esan, betiko ezinean, etsipenean eta trakets ibili garela, norabiderik gabe; niri dagokidanez, beste behin konbentziturik hedabide elebidunetan euskarak ez duela zereginik, edo zehatzago esanda, zeregin mendekoa duela, subordinatua.

## Egin eta Euskaldunon Egunkaria, maitale eroriak

Toki bakar batean ezin egon eta, UPVn urte pare bat neramatzalarik, *Egin* egunkaria editatzen zuen *Orain SA* enpresatik deitu ninduten, Administrazio Kontseiluko kide izan nahi ote nuen galdezka. Ohore handiagorik! Beldur eta kezkaz, baina sakonean egundoko pozez,

onartu nuen. Kide batzuek kontseiluan zeukaten tokia utzi behar zutela eta niri eskaintzen zidaten leku bat. Behin sartuta, Iñigo Iruinek utzitako idazkari-kargua eman zidaten, eta hantxe ibili nintzen —UPVko lana utzi gabe—, egunkaria, irratia eta enpresa bera itxi zituzten arte. Lau urteko esperientzia baino ez neukan kazetari bezala, baina "etxea ondo ezagutzen duen bat nahi dugu", esan zidaten; "euskalduna zara eta euskarari bultzada eman nahi diogu", azaldu zidaten, euskarazko kazetaritzari dagokionez nire kezka ondo ezagututa; eta gainera, "estruktura guztiak ados daude zu hautatzearekin". Kazetari hutsa izatea nuen amets, baina nola muzin egin tamainako proposamenari? Losintxak alde batera, nola ez saiatu laguntzen maite nuen, egunero erosi eta irakurtzen nuen hedabideari, *Egin*i?

Egunkari haren urterik latzenak egokitu zitzaizkigun eta halabeharrez, Administrazio Kontseiluan ia soilik ekonomiaz hitz egiten zen —egunero eta etengabe—, publizitatea erretiratzen ari zitzaigun, Jaurlaritzaren, eta bereziki Atutxaren, eraginez batik bat, salmentak ez ziren txapliguak botatzen ibiltzekoak, eta enpresa errotik berbideratu beharra zegoen. Egia esan behar badut ez nintzen oso eroso sentitzen, ekonomiaz tutik ez nenkielako. Bileretan ingeniaritza ekonomikoko gaiak geneuzkan aztergai, zer erremedio! Horretan asko zekitenak bazeudenez eta enpresarekiko maitasuna mugagabea zeukatenez, haien lerroan ibili nintzen. Nire txanda noiz etorriko zain nengoen, nire ekarpen propioa egin ahal izateko, eta halako batean "Egin berria" proiektuari ekin zitzaion. Han eduki nezakeen aukera, neritzon —Kazetaritza Fakultateko irakaslea nintzen, Hedabide Inprimatuen Teknologia azaltzen nien ikasleei UPVn, euskaraz zerbait banekien...—. Baina ez, ez nuen batere tokirik izan ezelango batzordetan. Gauzak! Uzteko egon nintzen. Aitzitik, zertarako sartu beste arazo bat hain zanpatuta zegoen enpresa batean, ez nintzen izango ni betiko putreei bazka lerdetsua emango niena. Ez zeukan zentzu

handirik, eta diziplinatua izaten badakit. Horrekin koherente —horren ustea dut bederen—, zalantzarik gabe ukatu nuen ezustean erredaktoreburu-lana eskaini zidatenean *Egin* berrian. Urte asko neramatzan egunkari bateko idazgelatik kanpo, ez ziren izan kazetariak lanpostu hura eskaini zidatenak… eta beherago kontatuko dudan beste arrazoi potolo bat ere bazen tartean, nire bizitzan pisu handia izan duena. Mila esker, baina ez. Produktu berria kalean, euskara-alorrean zerbait egiten saiatu nintzen erredaktoreekin zuzenean, gure hizkuntzaren portzentajea zertxobait igotzeko. Ordurako ez nuen horretan sinesten, baina ostera saiatzeagatik ez genuen ezer galtzen. Laster egin genuen pott aspaldiko ustea egia zientifiko —behin eta berriro frogatua— bihurtuz: hedabide elebidunean euskara beti galtzaile aterako da, bigarren mailako hizkuntza izatetik harago joaterik ez daukana, gai garrantzitsuak beti hizkuntza nagusirako utziz. Ezinaren lekukoa da euskara. Lekukotzari eustea badagoela garbi aitortuz, ezinbestekotzat jo daiteke euskara hutsezko hedabideen premia.

Gutxienez laurogeiko hamarkada osoa zeraman euskara hutsezko egunkari bakar baten aldeko erronkak. Asmoa askoz ere zaharragoa zen, gutxien-gutxienez Lizardiren garaikoa, Xahoraino ez joateagatik, baina *Argia* astekarian bildutako koadrilak zeuzkan ideiak, estrategia, gogoa, adorea eta erabakia: dena batera. Eta nire txikian haien alde egin nuen, niri zegozkidan alor guztietan. Beti ere nire lana utzi gabe, UPVn eta *H2000Eliza*n, eta *Egin*eko kudeaketan.

Ezaguna da proiektuak Egunkaria Sortzen promotorea abiatu zenetik *Euskaldunon Egunkaria* kalean jarri arte egindako ibilbidea. Doktore-tesia atondu nuen gai harekin 1992an, eta Txalapartak argitaratu zidan liburu gisa Joxemi Zumalaberen omenez (*Joxemiren uzta; euskal prentsa herri-proiektua da*, 1993), eta ez naiz hemen gauzak errepikatzen hasiko. Nire sorpresarako, tesi hura ez zuten nonbait oso

gustukoa izan une hartan *Euskaldunon Egunkaria* kudeatzen zutenek. Une desegokian atera omen nuen. Alferrik nik azaltzea egunkariaren mamitze-prozesuan esandako gauzak zirela denak, gorputz teoriko baten markoan interpretatuak. Une desegokian atera omen nuen. Baliteke, izan ere arazo ekonomiko larriekin jaio zen euskarazko lehen egunkari osoa, eta beharbada une hartan ez zen komeni zirikatzen ibiltzea. Hala azaldu zidaten. Ez dut eztabaidatuko. Zerbait edukiko zuen liburuak bolada batean (ia) inork ez aipatzeko arloko azterketetan.

Egundoko zoria izan zen neretzat Joxemi Zumalabe ezagutzea, Martin Ugalderen hitzetan esateko bera izanik proiektu haren *burua eta bihotza*, biak batera. Haren harremanetarako eta enpatia sortzeko gaitasunak bildu ninduen bere albora, eta proiektua mamitu arteko zeregin askotan parte hartu nuen, poz handiz, beste askok bezala. Behin egunkaria kalean *Euskaldunon Egunkaria*ren Administrazio Kontseiluko kide izendatu ninduten *Orain SA*ko akzionisten izenean. Zer diren gauzak, hori baino lehenago nire bizitzako ezetz mingarrienetakoa eman behar izan nion Zumalaberi. Kaleratzeko ia dena prest zegoenean zuzendaria falta zen. Uko ospetsuak jaso ondoren —nire informazioaren arabera Torrealdai, Joxerra Gartzia, Iñaki Zabaletarenak, gutxienez— niregana jo zuen adiskideak, eta nik ere ezetz. Hura marka! Hamarkada oso bat euskarazko egunkariaren premia aldarrikatzen eta konpromiso zehatza eskatutakoan, kale! Izango zuen garrantzia nire burua zuzendari gisa ez nuela ikusten, baina ordurako beste urrats sendoa emana nuen UPVn —*Egin*eko eskaintza ere baztertzera eraman ninduena—, Irakaslego Propioaren aldeko borrokan kaleratuta nengoen eta ezin nuen pankartako kidetza murriztu, sei lagun baino ez ginen eta gauza gehiegi zegoen jokoan erronka hartan (hamabost urte iraun zuen irabazi arte). Azalduko dut zerbait, baina ez zait ahaztu Joxemiren etsipena. Guztion zorionerako gizon hura (G.B) ez zen erraz kikiltzen eta ni

gabe ere aise egin zuen aurrera egunkariak, Del Olmo epaileak indarrez itxi zuen arte.

Itxi bitartean egindako hainbat eta hainbat bileratan zerbait emango nuen —Donostiako Zapatariene mitikoan biltzen ginen astean edo hilean behin eguneko menua jatera, eta gero *Jakin*eko egoitzan lan egiten genuen—, baina ni kudeatzaile baino gehiago kazetari huts sentitu izan naizenez, hiruzpalau urtean astero idatzitako zutabetxoarekin geratzen naiz. Nire txanda bukatuta liburu batean bildu nahi izan nituen zutabetxo haiek, baina inork ez zidan onetsi: ez Elkarreko Mendigurenek —zutabeak ia denak gai bakarrekoak zirelako eta beraz interes gutxikoa—, ez Ereineko Aldekoak —balio literario eskasekoak zirelako—, ez Txalapartako Barrenak —tankera hartako liburuurik ez zutelako inoiz argitaratu—. Bego hori ere. Arrazoi izango zuten, eurak dira dakitenak. Zutabe gehienetan UPVn gertatzen ari ziren arazoetan bazkatzen ziren nire lerroak, baina nire ustez arazo hura ulertzeko aproposak zirelako edota argitaletxeetako kudeatzaileen arrazoiek nire Egoa kolpatu zutelako, erresumina ez zait sendatu. Ai idazleon bihozbera!

*Euskaldunon Egunkaria*ren itxiera ez zen lehen itxiera izan Euskal Herrian. Urte batzuk lehenago (1998), itxi zuten *Egin*, "gure egunkaria eta irratia", eta ondorioz gu guztiok —Administrazio Kontseiluko lagunok, bi kazetari eta zenbait laguntzaile *inputatuta* geratu ginen; batzuk, ni tartean, ETAkoa izateagatik, eta besteak laguntza emateagatik.

Uztailaren 17a zen. Emaztea eta biok Bartzelonara jaitsiak ginen, Blaneseko (Girona) oporraldia eten eta Catalunyako familian egun batzuk pasatzeko asmoz. Goizean goiz, kafearen usainera ohea utzita, irratia marmarka entzun nuen, koinatak sukaldean piztuta zeukana hain zuzen, lehen albisteak jaurtiz: "*Egin i*txi dute, polizia indarrez

sartu da Eziagon eta hainbat kide atxilotu dituzte, Administrazio Kontseiluko kide guztiak barne". Kontxo, denak ez, ni hemen nagok! Etxekoek entzun zuten arren, gogoa beste nonbait izango zutenez ez ziren jabetu albiste hark gure artean izan zezakeen garrantziaz. Ni, aldiz, durduzatuta geratu nintzen. Bizpahiru egunez gorde nuen albistea nire golkoan, eta denetan sukar altua izan nuen, inor ez asaldatzeagatik haren arrazoia azaldu gabe. "Ez naitek atxilotu baina bilatuko naitek", jakina, esaten nion nire buruari. Handik egun batzuetara Calella de Palafrugellen erosi nuen *El País*, eta bertan irakurri nuen *Egin*en itxieraren dimentsioa: berrogei eta zortzi (48) urte eskatzen zizkigun Baltasar Garzón instruktoreak gutako bakoitzari, ETAkoak ginelakoan. Ahal nuen bezala azaldu nuen etxean. Ezin zuten sinetsi, ez zuten posibletzat jo. Beraz, lasaitu nintzen. Hobeto horrela. Sufrimendua soilik niretzat geratu zen. Nire baitan banenkien zetorrena. Etor zitekeena. Etorri zena.

Zortzi (8) urte egon ginen epaiketaren zain, eta hamasei hilabeteko (16) epaiketa abailgarri bezain laidozgarriaren ondotik zuloan amaitu genuen: finean zortzi (8) urteko kartzela-zigorra *Orain SA*-koentzat, eta gutxiago gurekin zerikusia zuten gehienentzat. 18/98 zeritzan kronika liburu batean bildu gabe geratu zen, eta ni inbidiaz.

Beste batzuei eman zitzaien zilegitasun osoz enkargua, baina iristen ez zaizkidan hainbat arrazoi tarteko burutu gabe geratu zen. Hartara, kontatu gabe geratu ziren dozenaka militante zailduen urtetako bizikizunak, kontatu gabe haien uste eta zalantzak, etorkizun hurbilari buruzko gogoetak; kontatu gabe pikoloen eta maderoen portaera harroa epaiketa bitartean, epaileen jarrera zanpatzaile eta errespetu bakoa, *bikitimen* ordezkarien gorrotoa; kontatu gabe, epai-gela hartatik desfilatu zuten preso historikoen lekukotza; kontatu gabe inputatuen asteroko joan-etorriak eta epaileen aurrean erakutsitako dotorezia, denbora libre urrian nabarmendutako umore ona; kontatu gabe historia handiaren intrahistoria, barrukoa. Gaiak ematen zuen bada liburu ederrik osatzeko! Horretan ere gure historia puskaka kontatuta geratuko da, beste behin. Nik bitartean beste zeregin batean iraungi nituen epaiketa-egunak, gero Balentxi hamalaugarren apostolua izango zen liburua osatzen (Txalaparta, 2007), hain juxtu. Edozer gauza Angela Murillori ez entzutearren!

Zerbait aipatzekotan hauxe ekarri nahi dut orriotara. Kazetaria izan arren inork gutxik hartzen nau kazetaritzat, irakasletzat baizik. Badakit UPVko kazetaritza-irakasle izan nintzela —irakasle baino gehiago, irakasle kaleratua zehazki esateko—, baina nire bihotzak kazetaritzan ditu zainak; eta egia egiari zor atxilotu nindutenean *H2000E*ko erredaktoreburua nintzen. Hara txikion zorigaitza, handiek bezainbeste lan egin arren, ikusgaitz geratzen gara. Edozein moduz, kasu honetan borondate txarrik ikusten ez dudalarik, orain aipatzen dudan kontu honetan nire bizitzako hogei urte (20) hartu zituen gatazka unibertsitarioak du errua, zeinetatik hamabost (15) irakaslego propioaren aldeko aldarriz pankarta bati lotuta eman nituen, Leioako campusean paratuta.

## *Kartzelako-txokoan, beti erne (8)*

*Jendea, batik bat gazte jendea baina ez bakarrik gazteak, kalera atera da. Polita da espektakulua. Interes handiz jarraitu dut suminduen mobida. Noraino joango diren, hortxe galdera. Printzipioz oso ederra da. "Ez gaituzue ordezkatzen", diote, demokrazia erreala nahi dute, etorkizun politikoan zuzenean parte hartu. Eskuina urduri dago, eta betiko ezkerra ere bai. (...) Ea gauzak bideratzen asmatzen duten. Egunen batean bukatuko dira mobilizazioak, baina gai badira pare bat puntu zehaztu eta horretan zentratzeko, larri daitezela betiko borreroak! Aldarrikapen orokorrek ez dute deus aldatzen. (...) Gure prentsan irakurri dut Euskal Herrian aspaldikoa dela gazte konprometituen mugimendua, denetarik egin dutela kalean egoteko eta ordainetan egurra jaso dutela erruz. Batzuk kartzelan daude, Oier nirekin moduluan. Espainiako gazteria esnatu bada, eta gurea ez bada lokartzen, ongi etorriak. (...)*

*Goizean goiz, txabolotik jaisterakoan, miaketa egin digute. Erabat ezustekoa eta ezohikoa izan da ordu hauetan. Loaren orratzak kendu ezinik jaisten ari ginela, plaust; jantokia zapaldu orduko, bi funtzionario, eskuetan latexko guanteak, gure gauzetan arakatzen. Gauza guztiak kanpora, banan-banan txukun antolatutako motxila berriro harro-harro eginda. Puaff. Zertarako? Jendea kontrolatzeko eta "adi egon, hemen gaude" ohartarazteko. Inoiz ez dute ganorazko ezer harrapatzen. (...)*

*Topasera bidali dute Marcelino nire ikaslea. Lastima. Bere bizitzan lehen aldiz lasai egoten hasi eta hara non aldatzen duten. Ez dakit zergatik mugitzen duten, baina tira, berak ere badu erru pixka bat, hainbeste berotu dizkio belarriak hezitzaileari hau eta hura esanez, azkenean, to aldaketa. Preso hauek hainbeste urte daramatzate zuloan, ez dakite bereizten zer komeni zaien eta zer ez. Marcelinok hogeita bost egingo ditu laster barruan. Berrogei eta hamalau baditu, eta analfabe-*

*toa zen. Nirekin irakurtzen eta idazten ikasi du, baina prozesua burutu gabe doa. Orain betiko espiralean sartuko da, eta auskalo non eta nola bukatuko duen. Asko sentitu dut haren martxa. Astakilo hutsa da, baina umore onekoa eta ez bihotz txarrekoa. Ondo joan bellotero! (...)*

*Omar sahararra da, Tindufeko haurra. Gerran hildako aita baten umezurtza, drogaren menpe. Osasun-arazo larriak dauzka: asmatikoa da, diabetikoa, egunean hiru aldiz jarri behar diote intsulina, hainbat saiheski apurtu zizkiotenez ez du arnasa ondo hartzen, giltzurrun-zati bat falta zaio. Apenas du haginik aho beltzean. Erizainek eta funtzionarioek oso gaizki tratatzen dutela esaten aritu zait eskolako aulki batean jesarrita. Salatu nahi ditu. Intsulina berak jartzera behartu nahi dutela eta ukatuz gero lotu egingo dutela. Ezin duela, ikusmen-arazo latzak dauzkala eta beraz ez dela gauza ziztatzeko tresna kargatzeko. Ahal dudana egin dut. Zaintza Epaitegian kexa zela egokiena konbentzitzen saiatu naiz. Ez dudala alfer-lanik egin nahi, esan diot. Edozein moduz berak agintzen didana egingo diodala. Hasi naiz. Ez dago ados, idazki asko egin ditudala dagoeneko eta lasaitzeko faborez. Ez. Azkenean purrustada bat bota behar izan diot. Papera hautsi eta berria egin diot. Aski duzu. Arratsaldean arnasa hartu ezinik antzeman dut, eta bera baino deserosoago jarri naiz ni, nire senetik atera nauelako. (...)*

*"Jesus, komuneko paperik ba al duzu?". Ez diot erantzun, aurpegira begiratu, nire gauzak arakatu eta rollo bat eman diot. Eskerrak eman gabe joan da bere txabolora. Euskalduna da, gure herritarra. Preso arrunta. Bortxatzailea. Berdin dio. Nik ez dut bihotzik inori behar duena ukatzeko. Batzuek oso gaizki begiratzen diete bortxatzaileei. Garai batean garbitu egiten zituzten patioan, kontu handiz ibili behar omen zuten bokiek. Badakit oso gaizki ikusita daudela sozialki, delitua bereziki gaitzesgarria delako. Ados. Pasa den igandean mezetara joan nintzen, kartzelan mezak nolakoak diren ikusteko kuriositatez. Iritsi zen jaunar-*

*tzeko txanda, eseri nintzen. Nire aurrean zegoen beste bortxatzaile bat, altxatu eta aldarerantz abiatu zen. Nor naiz ni mutila epaitzeko? Ordaintzen ari da, beraz zer gehiago? Hau ere euskalduna da". (...)*

*Funtzionarioak piztiak bezalakoak dira, beren lurraldea markatu beharra daukate. Batzuek modu xumean egiten dute, usaina utziz; beste batzuek, ordea, kiratsez markatzen dute beren jabegoa. Lehoiek bezala, behin eta berriro euren presentzia nabarmenduz, pixaren pixez; edo hipopotamoek bezala, euren presentzia nazkagarria jasanezin bihurtuz, kaka eta gernu-parrastada etengabez. (...)*

*Egun gogorra izan da hau Txominentzat. Moduluko eskizofreniko batek taula astun bat bota dio burura: eskerrak eman ez dion, bestela beharbada bestelakoak izango ziren hitz hauek. Jantokian eserita zegoen Txomin, eguneko gurutzegrama egiten, eta belarriaren ondoan zerbait sumatu du pasatzen, meteorito bat bailitzan. Berehala altxatu dira dozena bat arrunt eta gutxigatik ez dute Paskual gasteiztarra bertan garbitu. Txomin zurbil eta kezkatuta geratu da. Ez da lehen aldia izan. Orain hilabete batzuk ostiko bat jo zion albotik pasatzean. Diote botikak hartzeari utzi diola eta ondorioz desorekatuta dabilela. Baliteke. Oso sano ez dago. Ez du egun osoan ia inorekin hitzik egiten. Beti bakarrik dago, gora eta behera, erretzen eta kafea hartzen, sustantziak sustantzien gainean. Txominek mehatxatuta zeukala esanaz eraman dute, arrunten oihuen artean. Ez da ezer gertatu, zorionez eta kasualitatez. Salaketa jarriko ote duen galdetu diote bokiek Txomini, hori balitz bezala soluzioa. Epaiketa? Ez al dakite hemengo kartzeleroek nola dabilen gasteiztarra? Norena da ardura? Zer dela eta daukate modulu arrunt batean? Hau al da gaixo eskizo baten tokia? Salaketa jartzekotan ez al ditugu eurak salatu behar? Nolatan ez dute hurbiletik zaintzen? Tira. Gaurkoz libratu dugu egun hau! (...)*

# -II-

Nik neronek espresuki erabaki gabe gurutzatu ziren nire bizitzan kazetaritza eta unibertsitatea, eta nire ondora etorri zirenean suhartsu besarkatu nituen bi-biak; batzuetan bat gehiago, eta bestetzuetan bestea. Esan dezadan enbor bereko bi adar gisa izan direla niretzat bi arlo horiek praktikan, bata bestearekin elikatu direnak sustrai berberetik hedatutako izerdi berberez. Jendea hezteko hezi ninduten, jendearen arimaz arduratu, kudeatu eta gidatzeko, nik neuk irentsitako egia irakasteko, jendearen bihotza ukitzeko, kristautasunetik jariatutako mezua haiengana helarazteko —bistan denez pretentsioak ez dauka neurririk, alafede!—. Norberak bere bide propioa duenez, kazetari izanda iragarri nuen neurea, eta adin nagusitik aurrera ez nuen beste xederik kausitzen niretzat. Apaiz kazetaria edo kazetari apaiza. Zein zen substantiboa edo zein adjektiboa ziur ez dakit, hor nonbait, kontua da bietan jardun dudala, ez oso arrakasta handiz. fraide-apaiz izatea bera kristau izateko nire era pertsonala izan da, bide horretan abiatu nintzen une-unetik, eta ez dut beste modurik ikusi hogeita hamahiru urte bete artean; hots, berandu arte.

Adinaren azken bueltan, nire bokazioa zein izan zen galdetzen badiot nire buruari nekeak dauzkat zuzen erantzuteko —bokaziorik badagoen izango litzateke bueltako galdera, eta behar bada erantzuna bokaziorik ez, norberaren hautuak direla—. Iruditzen zait irakatsi zidatena aukeratu nuela, eta aukera hark jendea (herria?) heztea zekarren. Maixu izatera bideratuta nengoen: beste nortasun-agiririk ez neukan, horretan identifikatzen nuen nire burua, norabide horretan jarraitzea izan zen nire aukera. Ez dut ukatuko gustura abiatu nintzela, eta urtetan ibili nituela bide haiek, ziaboga hartu bitartean.

Nolanahi ere den hezkuntza-alorrean eta kazetaritza-arloan jardun dut gerora, eta oraindik. Esan nahi dut zerbait irakatsi behar nuen sentsazioa (agindua?) izan dudala beti eta edonon. Umetan eta gaztaroan xurgatu nuena ona zelakoan, jendeari begiak irekitzeko gaitasuna banuelako eta hobekien espresatzeko topatu nuen era kazetaritza zelakoan. Ez naiz irakaslea izan horretan plazerra lortzen nuelako —oso-oso gustura ibili naizen arren ia uneoro—, are gutxiago nire premia materialak asetzeko modua zelako —nahiz eta, egia esan, hortik bizi izan naizen xume, ahal izan dudan arte, diruan begiak inoiz jarri gabe eta horretarako batere interesik gabe—, baizik eta printzipio batzuekin koherente izateko premia nuelako (agindu bat?), behar batzuk nagusituta edo, nahi bada, nirea izan ez arren nik neure haragiaren haragi egindako mezu bat azaltzeko. Premia militantea izan da nirea, behar morala. Hori dena zertan mamitu den besterik izan da, bigarren mailakoa ere bai, eskura izandako tresnez baliatu naiz eta ahal izan ditudan betebeharrak bete ditut.

Ni baino seminarista gazteagoei frantsesa irakasten hasi nintzen, Agurainen. Nekiena transmititzen, ni bezala apaiz izan nahi zutenei atzerriko hizkuntza bat irakasten. Asko ez nekien, baina moldatu nintzen. Nire apaiz-ikasketak burutu ondoren, erlijioa irakasten jarri ninduten Donostian, urte betez. *Boy scout*en kontseilari izan nintzen aldi eta epe berean, hezkuntza ez arautuan. Urte batzuk geroago, erlijioa eta euskara irakatsi nituen txandaka, bai fraideen ikastetxe batean, Leioako Askartzan, bai Algortako San Nikolas ikastolan, eta lau urtetik hamazazpi urte bitartekoekin aritzeko zoria izan nuen, gai batean zein bestean edo bietan. Euskarari dagokionez, helduekin gau-eskolan jarduteko parada ukan nuen, ikastolako geletan, iluntzean. Euskararekiko interesa bazuten gizon-emakume haiek, euren lan-jardunari beste ordu-pare bat erantsiz edo udan, Elgoibarko Aubixa baserrian, aste batzuk barnetegi-eran, bertan bizi eta ikasiz.

Erlijioari dagokionez, berriz, Getxoko parrokia guztietako sendotza-programako koordinatzaile izan nintzen, sendotza sakramentua hartu nahi zuten gazteekin. Azkenean UPVko geletan bukatu nuen, Leioako Kazetaritza Fakultatean, harik eta sei urte burutu ondoren kaleratu ninduten/gintuzten arte Irakaslego Propioaren aldeko borroka bortitz bezain luzean. Hamabost urte iraun genuen elkarrekin pankarta batekin Leioako campusaren atarian, egunean zortzi ordu, eten gabe, zein giro egiten zuen erreparatu gabe. Urte haietan guztietan irakasle nintzen ziurtasuna neukan, irakasle kaleratua, baina substantiboki irakaslea. Ordurako ondo frogatuta neukan, gazte-gaztetatik intuitiboki ikasitakoa, alegia norberaren adibidearekin egiten dela bat irakasle, bizitza bera dela balizko irakasleei irakats ahal zaien ikasgairik mamitsuena eta iraunkorrena. Jakina, horrek beste gai bati irekitzen dizkio ateak parez pare, alegia irakaslearen funtzioari, irakasle izatearen mami-mamia dena berau, irakaslea izatea zer den funtsean, eduki-banatzailea edo/ala eredu bat; bareago esateko, bietako zein aldek duen lehentasuna, ez bainaiz orain hasiko edukiek garrantzirik ez dutela esaten. Nire kasuan pisu handiagoa izan du beti hezitzaile izateak irakasle izateak baino, besteak beste askoz ere hobeto egokitzen delako alderdi hori nire hasiera-hasierako hautu eta baldintzetara. Ez dut denbora askorik izan eduki-banatzaile ona izateko: apenas sei urte egin nituen jarraian gela barruan, eta inbidia diet beren alorreko gaietan txukun jantzi direnei.

Hezkuntzari dagokionez nire barne-abentura borobiltzeko, esan dezadan Dueñaseko espetxean ere irakasle edota hezitzaile jardun dudala; lehenik Extremadurako analfabeto bati erdaraz irakurtzen eta idazten irakatsiz, gero Azkoiengo nafar bati euskararen premiazko oinarriak ematen, kalean jarrai dezan. Zer diren gauzak, espetxea zapaldu orduko Leioan ikasle izandako neska bizkaitarra, Itzi, topatu dut, kotxean umetxoa zekarrena, eta esan du: “Hau marka, maixua

preso". Bada, bai: ikaslea eta irakaslea. Aipatutako eduki horiez gain irakatsi ote diet gainerako presoei zuzena izaten, daukadana partitzen, premien arabera laguntzen, edo besterik gabe errespetuz tratatzen? Aitor dut azkenean gogaikarri samar eta zama astun begitantzen zaidala irakasteko, hezteko joera hau, ia-ia tema konpultsiboa. Alegia, nork agindu dit niri besteenetan sartzen, inor bideratzeko neketan ahalegintzea? Erantzuna badakit, ez daukat zalantzarik: "Non dago zure anaia?" eta "Maitatu, bizitza emateraino maitatu" proposamen/agindu biblikoetan dago erantzuna, nire jardunbidearen sorkaria, eta horri erantzuten saiatzen naiz. Ahots biblikoaren ustezko jabeari jaramon gutxiago egiten hasi naizenetik beste era batera begitantzen zaizkit gauzak, erlijio-agindua baino areago elkartasun-kutsua hartzen ari dena; lehen bezain premiatsua, bai, hori bai, baina dimentsio erromantiko gutxiagokoa, lilura epikorik gabea, azken buru edertasun eskasekoa, nire begietara. Errealagoa nolanahi ere. Itzuliko naiz horretara.

## Hezkuntza askatzailearen bidean

Unibertsitateko gaia pittin bat baztertuta nire beste hezitzaile-zeregin bat aipatu nahi dut, seminaristen ardura eman zidatenekoa. Hogeita sei-zazpi urte baizik ez nituen, beraz eskarmenturik gabekoa nintzen eta gainera, Madrilen ikasle nintzenean nozitutako kolpe psikologikoa hartu ondoren eman zidatenez enkargu hura ez nago batere ziur ni nintzenetz zeregin hartarako pertsonarik egokiena, baina halaxe erabaki zuten nire orduko agintariek eta ni bete-betean eta suhartsu saiatu nintzen. Kazetaritzako lehen urtea amaitu ondoren izan zen, nire karrera etenda geratu zenean, Zizur Gutian hasieran eta Leioako Askartza megaproiektu berrian gero; tartean

Bilboko San Frantziskoko ikastetxe zaharreko gela hustuetan (zein garai polittak haiek, ikastetxeko idazkaritza izandakoan oherik gabe, tatami berde batean etzanda lo egiten genituen haiek!).

Hamasei-hamazazpi urteko gazteak ziren nire kargu zeudenak; Nafarroako fasean Irubide institutuan ikasten zuten batxilergoa, eta Bizkaikoan Larraskitun eta Askartzan bertan. Euren zeregin akademikoetan zeudenean niretzat zen nire denbora, eta gazte haien bizi-baldintzak eta elkarbizitza patxadaz antolatzen jarduten nuen. Hogei-hogeita hamar gazte izan ziren gehienez eta ondo gogoan ditut haietako asko. Gainera bi, Joxemi eta Elias, ni bezala preso egon dira oraintsu arte. Printzipioz gazte haiek fraide klaretar eta beharbada apaiz bihurtzea zen enkargua (prozesu hartan laguntzea, hain justu, edo beste era batera esanda, euren bokazioa antzematen saiatzea). Bahea nik astindu behar nuen Euskal Herriko klaretarren izenean.

Iritsi orduko ulertu nuen guk izandako hezkuntzak ez zuela funtsean balio. Garaiak beste batzuk ziren eta nik jasotako hezkuntza ez zen erreala. Gu seminarioan sartu ginenetik, eskala murriztuan fraide kontsideratzen gintuzten, eta eskala murriztuan, fraide bezala bizi behar genuen: lana, otoitza, diziplina, morala, komunitate-bizimodua, etab., eta jakina, atzera eginez gero, bokazioa galduta alegia, infernuko atarian geratuko ginen. Gure adinekoengandik eta familiatik aldenduta bizi ginen, Jainkoak aukeratutako umeak baikinen, eta barnean generaman hazia emankor gorde beharra zegoen, kutsadurarik gabe zentzumenak mortifikazioan bezatuz eta kanpoko haize zakarretatik babestuta. Gure kasuan horretarako zen funtsean jantzi beltza eta sotana bera: hesi ilun bat.

Ni ez nengoen hori dena bere hartan betetzeko prest, ez behintzat oinarri berberetan. Izan ere haurra gizon ttiki ez den gisa berean

seminaristak ez ziren fraide-apaiz ttikiak. Xehetasunak xehetasun nik askatasuna ezarri nuen abiapuntuan, eta hala esan nien gazteei lehen egunetik: “Zuetako gehienak ez zarete klaretar izango —estatistikoki beti gertatu da horrela; gu hirurogeita hamar hasi ginen eta hiru apaiztu—, beraz niretzat gazte ameslari batzuk zarete, fraide edo apaiz izan nahi duten edo ez ebatzi behar duzuenak. Elkarrekin biziko garenez, ni ere zuen artean, arau batzuk jarri behar ditugu: ordutegia ikasteko, jolasteko, altxatzeko, garbiketa, errespetuzko jarrera, etab. Etxe honetan nik egunero emango dut meza eta meza aurretik otoitz egiteko aukera egongo da, berdin ilunabarrean. Ez zaudete etortzera behartuta. Jokatu askatasunez, baina ez eman tokirik nagiari. Astean behin batzarra egingo dugu eta nahi adina gai aztertuko ditugu han. Bestalde, ni hogeitalau ordu edukiko nauzue zuen zerbitzuan”.

Gutxi gorabehera horixe zen programa. Nagusiei aurkeztu nienean —modu formalagoan, noski— sudurra zimurtu zuten baina onartu egin zidaten, kontuz ibiltzeko gomendatuz. Gazteek harrituta eta pozik hartu zuten *prefekto* gazte berriaren jarrera eta plangintza. Ordurarte estilo zaharrean hezi zituztenez demasia bat baino gehiago egon zen, baina agudo bideratzen saiatu ginen; batzuetan ni neu, besteetan denon artean. Nolanahi ere aparteko gauzarik ez: bateon batek eskolara joan ordez piper egin zuela, besteren bat neska-koadrilarekin zebilela, halako batek manifa batean parte hartu zuela, urlia protestaka joan zela eskolako zuzendariarengana eta gisa horretakoak izan ohi ziren komentuko zaharrenek ohartarazten zizkidaten kexuak. Testuinguru hartan bokazio-faltaren aztarna garbiak ziren haiek denak, pentsa. Izan genuen krisi-egoeraren bat edo beste, adibidez ikurrinaren kontura. fraide klaretarrak eta “nire” seminaristak etxe berean bizi ginen bi pisutan banatuta: goian nagusiak, behean gazteak. Ni neu komunitate osoko aitanagusi banintzen arren, behe-

ko solairuan bizi nintzen gazteekin. Bada Aberri Egunean egundoko ikurrina agertu zen goizean goiz beheko balkoi nagusiaren mastan. Norbait konturatuta niregana etorri zen gehiegikeria hartaz kargu hartzera: hura oso larria zela eta zalantzarik gabe “nire” seminaristen kontua zirudiela. Arrazoi zuten, bai, baina nik ez nuen ziur jakin handik dozena bat urte pasa arte. Susmoa benetakoa zen, eta ni poz-pozik nengoen “nire” seminarista bat izan zitekeela pentsatuz. Bakarren bat hagitzez ongi ari zen herriko giroa, eta nire jarrera, interpretatzen. Herria, Euskal Herria, kontuan hartuz jokatzera gonbidatzen nituen, euskara ikastera, euskal musika, ohiturak, gogoak eta borrokak ezagutzera bultzatzen nituen, ahalen neurrian parte hartzera. Biblioteka eta diskoteka hornitzen saiatu nintzen, bereziki jende konprometituaren testuak erosiz, hurkoaren alde bizia eman zutenen biografiak, etab. Lehenetsiz: Nazaretheko Jesus, Camilo Torres, Gaspar García Laviana, Joan Alsina, Che Guevara, Malcon X, Martin Luther King, sandinistak, El Salvador eta Guatemalako iraultzak; indarkeria-ezan nabarmendutako autoreak: Gandhi, Tolstoi, Müller, Lanza del Vasto, Arias, etab.

Kritikarik zorrotzena izaten zen ez zutela egunero meza entzuten. Hura ere egia zen. Aldiz, inork ez zigun txalotzen noizean behin egiten genituen eukaristia eta paraliturgia luze, parte-hartzaile, hunkigarri eta aberatsak. Ziur nago, ordea, gazte haiei ez zaizkiela inoiz ahaztu une haiek; are, seguraski inoiz gutxitan bizi izan dutela aurrerantzean une haien pareko ezer: gogoeta haiek, musika eta usain hura, giro lasai eta presiorik gabeko hura —denak lurrean eserita moketa goxo baten gainean—, aitorpen bihozkor haiek, otoitz iradokitzaile haiek Juanjo eta Rikardoren gitarrak lagunduta, Katixima Holandarreko pasarte berritzaileak, Jesus Nazarethekoaren parabola ederrak, elkartasun pozgarri hura.

Gauza haiek eta beste batzuk zirela eta ez zirela Askartza utzi eta nire kontura bizitzen jarri nintzenean beste hiruzpalau klaretarrekin, gure etxera etorri zen seminarista gazte haien delegazio bat esanez eurek ere ospa egingo zutela, ni gabe ez zutela jarraitu nahi. Nigatik ez egiteko, gomendatu nien. Komentua utzi nuela baina ez Elkartea. Itzultzeko eta jarraitzeko beren bidea modu autonomoan ebazten. Nire bizitza ez zela eurena, eta nire hautuak ere ez. Nolanahai ere bazekitela non bizi nintzen, zerbait nahi izanez gero. Tira. Gazte haietatik bi apaiztu ziren —batek gerora utzi du, apaiztu ondoren—, gure garaiko portzentajean. Niretzat balio definitiboa duena, eta ia ezerk bezala asebete nauena da urte batzuk geroago gazte haietako talde batek, denak gizonduak, esandakoa, hots, ahobatez aitortu zutena: “Lehenengo aldiz geure bizitzan libre eta gustura sentitu ginen seminarioan, gure bidea presiorik gabe hartzen lagundu zenigun”.

*Errementariaren etxean koilarak zurezko*, esan ohi da. Urteak pasata ezkondurik, alaba bat izan genuen, kale gorritik adopzioan hartuta, ijito kastakoa. Emaztea eta biok beti maixu-maistra izan ginen arren porrot galanta erdietsi dugu, edo hala dirudi. Genekien guztia emanda ere ez dugu asmatu.

## Jaioko dira berriak

Leioako Fakultateko haria berrartuz, esan bezala apenas sei urte egon nintzen geletan irakasle, lana normal egiten. Sartu orduko egin zuen eztanda estatu espainolean zehar lehendik bazetorren irakasle ez funtzionarioen borrokak eta, Euskal Herrian egonik, borroka hura berehala txertatu zen askapen sozio-politiko nazionalean. Borrokaldi haren zertzeladak irakurri nahi dituenak jo beza kalera-

tuok idatzitako testu mardulera (*Historia de una pancarta, la lucha por el profesorado propio*, Arabera, 1999). Oro har elementu aski badago han apustu historiko hura ulertzeko, baina beti gertatu ohi denez barne-historietan, pankarta hartako kide bakoitzaren egia ezkutuak —zeinaren uhin guztiak oraino baretu ez diren— aise gainditzen ditu liburuaren orriak.

Niri-neuri dagokidanez, orri haietan dagoen guztia nire eginda ere —nire historia pertsonalaren zati garrantzitsua baita, ez alferrik hamabost urte joan ziren bertan—, baditut gogoeta osagarri batzuk egiteko, edonola ere soilik nireak direnak. Borroka hura ez zen nik amestu bezala amaitu, izan ere ustez betidanik izandako xedeak eskuratuta, talde txikia izan arren helmugara denok batera iritsi ez izanak ez dit lortutako emaitzak behar bezala gozatzen uzten. Beharbada beti gertatu ohi da horrela, alegia bidean zauden bitartean helburu urrun baina lorgarriak bihotza zabaltzen dizun bezalaxe, edozein oztopo, zailtasun eta traba gainditzeko indar pentsaezina ematen dizularik, helburua bera eskuartean daukazunean kaxkarra, zirtzila eta pobrea begitantzen zaizu, liluragabea, agian zuri baizik interesatzen ez zaizun zerbait —eta gainera zure kide batzuengandik betiko urrunduko zaituena—, haren onurak askok jasoko dituzten arren. Norberak du bere zintzotasunaren erantzukizuna, baina, ez dakit bada nola esan, niri zapore garratza utzi dit gure borrokaren amaierak, zalantzagabeko garaipenak. Seguru aski oso gaizki eraman ohi dudalako adiskidetasun urratuaren mina. Sentiberatasun-kontuak dira akaso, baina holakoxea naiz ni.

Hotzago aztertuta, askoz balorazio positiboagoa daukat ia bi hamarkadan gure zeregina eta mamia izan zen borroka hartaz. Xede baten xerka erabakimen sendoak, estrategia garbiak eta iraupen luzeak noraino eraman dezakeen ikasi dut. Alderantziz esanda, hori

gabe —helburua zuzena eta justua izan arren— ez dagoela deus lortzerik. Bizipen hori betiko da, norberaren historian ondare ukiezina bilakatzen da; nirean, zalantzarik gabe. Beste zerbait ere ikasi dut, alegia helburu handiaren bidean lorpen txikiak eskuratu behar direla, horiek ondo sendotuta hurrengo urratsa emateko aldartea prestatuz. Gertatzen dena da, tarteko helburu txiki horiek gizaki baten ahalegin osoa ahitu dezaketela, eta behar bada hurrengo pausoa beste belaunaldi batek eman beharko du. Adibidez guk euskal unibertsitatea ere amesten genuen, handira jota —hots, euskara hutsez funtzionatuko duen eta Euskal Herria osatzen lagunduko duen gure akademia gorena —nahiz eta orain, ia hamar urteko bueltan irakasle ospetsuei irakurtzen diedan horrek ez lukeela zentzurik unibertsitateak gaur egun eleanitzak direlako-edo—, baina guk kontratu laborala edukitzeko eskubidea finkatu genuen, irakasle izateko estatu arrotzeko katebegi ez izateko ezinbestekotasuna (halabeharrez funtzionario) hautsiz eta irakasle izateko egitura politikoen —edozein izanda haiek— zati ez izateko bidea sasiz garbituz. Alegia, gure hizkeran esateko, Irakaslego Propiorako estrata irekita geratu zen: gero gerokoak. Jaioko dira berriak.

Oraindik beste alderdi bat azpimarratu nahi dut, hots herriak antzematen badu bere onerako zerbait atxikitzen zabiltzala, beti eta baldintzarik gabe zure ondoan egongo dela. Hasieran agian ez; gero, ziur baietz.

Hamabost urte asko dira, eta asko eskaintzen dute. Trinkotasuna, konfiantza eta elkarreragina sortzen du hainbeste ordu elkarren ondo-ondoan egoteak, zeren urte haietatik ordurik gehienak zutik egonean eman behar izan baikenituen; batzuk Protecsako zakurrek zainduta, eta beste asko bakar-bakarrik. Ez dago, beraz, irauterik batasun sendorik gabe, helburu eta estrategiak partekatu izan ezik.

Nork esan behar zigun guri, sei izanda, hiru taldetan banaturik (3+2+1) bukatu behar genuela? Inoren erantzukizunak seinalatzen hasi gabe —eta are gutxiago errua botatzen— aipa ditzadan soilik niri dagozkidan gauzatxo batzuk. Ni nintzen han erlijioen erara *fededun* bakarra, eta borroka luze hari gogoz eta kemenez ekiteko motibazioak kristau-fedean ere aurkitzen zituena ni izango nintzen, zalantza askorik gabe bakarra. Horrek ez zuen ezer aldatzen nire ekarpena —elkarrekin luze eztabaidatuz erabakitzen baikenuen dena—, baina nire baitan oso ongi neukan "besteen alde", "hurkoaren onerako" —kasu horretan gure unibertsitatearen eta gure herriaren onerako— aritzearen txinpartak bizi-bizi eragiten zidala. Gure borroka erabat zibila zen, nola ez!, eta termino horietan ulertzen nuen nik ere, baina nire izaeraren zolan, nire nortasunaren behe-beheko geruzan, bazegoen beste bulkada hura ere, erabat zoriontsu bihurtzen ninduena, edozer gainditzeko kemena ematen zidana eta nire buruarekin erabat ados egoteko ahalmena pizten zidan zerbait; beste zerbait, hain justu, aurreko motibazio orokorrekin ongi asko ezkontzen zena. Eta hori guztiori, kontuan hartu ordurako ia erabat utzita neuzkalarik elizarekiko loturak, ohiko kristau-izabidearen estekak; ez, ordea, kristau-hezkuntzaren erroak, kristautasunaren jatorrizko joera esentzialak: lagun-hurkoaren patua zure egin, haren alde jokatu, pobreen edo premian bizi dena lehenetsi, ahalezkoa bada bizia eman, fisikoa ez bada gainerako guztia. Nik badakit horrek ez zuela inongo eragin espliziturik beste bostengan, baina nigan bazuen eta oro har ez dut uste ez inori ez gure xedeei batere kalterik zekarkienik. Nintzen bezala onartzen ninduten, eta nik haiek. Nire kristau-izaera, hura sentitu eta bizitzeko era, ez zen eragozpen iraupen luzeko borroka —batzuetan bortitz samarra— hartarako. Etsai asko egin genituen eta, aldi berean, adiskide jator eta maitagarri askoak irabazi; horietako batzuk, ahal izan dutenak, leialtasun handiz etorri zaizkit bisitan espetxera. Zoritxarrez ezin izan ditut besoen

artean hartu, merezi duten moduan estutu, espetxea utzi dudan arte, zortzi urteren bueltan.

Gutxiegi iraun zuen niretzat garaipenak, garaipena izan baitzen bete-betean UPVrekin erdietsitako akordioa. Akordioa sinatu eta ikasgelara itzuli orduko Soto del Realeko ziega estu batean nengoen, bizitzaren eta beste konpromisoen faktura batzuk ordaintzeko.

## Nahiaren eta ezinaren aldeak

Zaila da nire buruaz pentsatzea, eta den bezala ezagutzea, fraidetan bizi izandako urteak aztertu gabe. Elkarte hura utzi eta nire kasa ibilitako urteak bazter lagata ere ez, noski, baina erraza da ulertzea klaretarren artean bizi izandako hogeita bost urte haiek —hain urrunak eta hain hurbilak aldi berean, nire-nireak— zertu eta mamitu zutela nire nortasuna, etxetik eta geneetan nekarren lehengaia astindu eta birgauzatuz.

Labur esateko, zorretan nago klaretarren familiarekin. Alferrik da galdetzea zer izango nintzen haiek gabe, izan ere norberaren bizitza bat eta bakarra da, gerta zitekeen aukerak alboratu eta soilik gertatu dena kontuan hartuta. Gurasoen etxean neukan aukerak ez ziren asko, baina etxetik ateratzea erabaki nuenean nik ez nekien zeintzuk ziren aukerak, ezta baziren ere. Klaretarretan hazi nintzen, haiek zertu ninduten, eta egia esan, distantziak ematen duen baliabideen arabera esan dezaket askok ez dituztela izan fraide haiek nire esku jarri zituzten hainbat tresna. Askoz ere gutxiagorekin konpondu behar izan dute nirekin hasitako hainbat lagunek. Termino ekonomikoetan adierazita, ez diet itzuli nigan inbertitutakoa; eta termino psikolo-

gikoetan esateko asko espero zutela nigandik. Seguru aski antzeko zerbait gertatuko zaio edonori, norberaren familiak egindakoaz gogoeta egitean, alegia guraso langile eta saiatuek nekez eta ahaleginez metatu eta seme-alaben etorkizuna ontzearren jalgitakoak ez duela bueltarik, edo behintzat euren eskuetara, horixe baita guraso izatea, eskatu gabe ematea. Hala ere, elkarte batek erlijiosoa izan, politikoa, enpresariala edo dena-delakoa— badu berezko helburu bat: hazi, zabaldu, hedatu et nabarmentzea, eta horretan nik ez diot gehiegi eskaini nirea izandako elkarteari. Izan ere apenas egin baitut ezer klaretarren izena sendotzeko. Laster zapuztu nuen kongregazioa, apaiztu eta hamar urtera.

Urrutitik datorkit niri instituzioekiko konfiantzarik eza. Bere baitan daramaten mezua murrizten dute. Horren zerbitzura jarri ordez, alderantziz gertatzen da ia beti. Ez dira malguak, zurrunegiak bilakatzen dira. Denborarekin usteldu egiten dira, sortze-garaiko espiritua ezezagun eginez. Instituzio gehientsuenei gertatzen zaie. Harrapatuta sentiarazten naute, eta esplizituki esana dut selekzio bateko kide izan naizela, klaretarrenekoa, eta ez naizela sekula beste bateko kide oso izango. Beharbada ez naiz behar beste apal kide hutsa izateko, eta nire ikuspegiak zalantzan jartzeko; baliteke, baina nolanahi ere den, sekulako desasosegua, existentziala, sentitzen nuen klaretarron artean, ustez ez zuelako zerikusirik kristautasunaz eta apaiz erlijioso baten jokaeraz nik neuk zintzoki pentsatzen nuenak Elkarteak praktikatzen zuenarekin. Ez nintzen besteak baino hobea —orain ondotxo dakit, beraz ez dut inor epaitzen, bere garaian gogotik egiten nuen arren—, baina niri estuegi geratzen zitzaidan, zurrunegia. Eta are okerragoa dena, sortu zeneko xedeak betetzeko ezgai jotzen nuen, herrian arrotz, eta bere ezinean lasai. Hegorik gabe eta haizerik gabe nengoen, deseroso. Bitxia da: denok jatorri berbera geneukan, berdin heziak izan ginen, testu fundatzaile berberak generabiltzan,

bular berberetik edoskituak ginen, helburu berbera aldezten genuen, eta ordea, ez geunden ados eskuartean geneukana bideratzeko orduan, Euskal Herrian nola izan apaiz eta erlijioso.

Lehenik eta behin gu ez ginen apaiz hutsak, alegia apaiz-izaeraz gain kongregazio edo elkarteko kide ginen, elkarrekin biziz, komunitate bat osatuz —anaidia, esaten zitzaion—, berariazko helburu batzuk betetzeko bilduak, obedientzia, pobrezia eta kastitate-botoak eginda, gainera. Apaiz eta erlijioso binomio hartan bigarrenaren alde lerratu nintzen poliki-poliki. Hasieraz ez, noski; ni apaiz izateko sartu nintzen seminarioan, baina erraz ulertu nuen erlijioso izateak —fraide izateak, alegia— biltzen gintuela kideok elkarrekin bizitzera —izan ere, bai baitziren gure artean apaiz ez zirenak, *hermano*ak, apaizok bezain fraide eta klaretar printzipioz—. Komunitateak, elkarteak, anaidiak, berebiziko indarra hartu zuen nire bizimoldean, nire konpromiso pertsonalean. Ez nuen izan nahi nire kasa zebilen bat, ez eta lan ikusgarria eginda ere; eta, nire etsipenerako, berehala jabetu nintzen, elkarrekin bizi arren —toki berean bizi arren, jan, lo, otoitz egin, kutxa berbereko dirua erabiliz, etab.—, ez geneukala bihotz bakarra; beste modu batez esanda, ez ginela adiskideak, ez genuela elkar maite. Ez izateagatik ez ginela ezta koadrila bat, peña bat, lagunartea, elkarrekin disfrutatzen duena, elkarrekin ibiltzea gustuko izan ohi duena; egunero ezin bada, noizean behin, aldian behin dena laga eta elkarbizitza ospatzen dakiena.

Jakina, inork ez zigun irakatsi elkar maitatzen —gizonen arteko adiskidantza eta maitasuna arrisku hutsa zelakoan—, eta maitasunik gabe esango didazue zertan oinarritu daitekeen elkarbizitza etxe berean. Zertan? Misioan: helburu komunean. Horixe zen erantzun ofiziala: misio batek uztartuta. Misio edo beraziazko zeregina kongregazioaren fundazioan zetorren adierazita: "Une bakoitzean larriena

eta premiazkoena egin". Eta horrek —zehaztasunik gabeko goiburua zen— are gehiago urruntzen ninduen nire garaiko eta inguruko klaretarrengandik.

Esana daukat nik kazetaritzan, komunikazioan topatu nuela nire bide propioa; eta esana dut, baita ere, agintariei arraro samarra iruditzen zitzaiela nire hautua, Antonio Maria Claret Klaretarren fundatzailea, besteak beste kazetari izan zen arren —alegia, orriak eta liburuak idatziz bete zuen ebanjelizazio-zeregina—. Edozein moduz argi baino argiago neukan komunitatean bizi nahi nuela. Zergatik iruditzen zitzaidan, beraz, konkregazioko beste zeregin gehienak ez zeudela fundatzailearen mezuarekin sintonian? Zergatik zen hain zaila niretzat ulertzea, batzuk parrokoak zirela, beste batzuk irakasle eta harako haiek instituzioa kudeatu beharra zeukatela guztion ongizatea ziurtatzeko? Arrazoiaren jabe izateak dakarren harrotasuna izan daiteke erantzuna. Gazte sutsua nintzen, eskarmentu gutxikoa, egoera di-da batean irauli nahi dutenetakoa, denborari eta pazientziari leku egiten ez zekiena. Badakit. Baina horrek ez du dena esplikatzen. Funtsa ez behintzat.

Gu Vatikano II.eko apaiz-fraideak ginen, eliza bera eta elizatarron ikuspegia, jokamoldeak, zeregina eta geure buruak ulertzeko era erro-errotik aldatu zuen giroan zertuak: jendearekin bizi, apalki jardun nahi genuen, gure lanerako pobreenak hobetsi, Jesusek berak bezala. Euskal Herrian bizi ginelarik, eta gure herria ukatua zelarik, beren beregi egokitzen zen Jesusen mezu salbatzailea nire ametsarekin: Euskal Herriaren amets askatzailearekin bateginik bizi, haren hizkuntza ikasi eta erabili, eta gu, fraideon ahalmen guztia —jendea, obrak, ekonomia— herri pobretuaren zerbitzura ipiniz. Baziren beste pobre batzuk munduan, nola ez, urruneko herri kolonizatuetan eta bazter marjinaletan, baina iruditzen zitzaidan *misio-lurraldeeta-*

*ra* joatea hemengo errealitate gordinetik ihes egitea zela. Hala, ondo gogorazten dut nire lagun min batek Boliviako bidea hartu zuenean —bertan zendu zen gaixoa— nola esan nion: "Bat gutxiago". Gaitz erdi irizten nion beste herri ukatu batzuetara joateari, baina gure herria, euskalduna, kultura ukatua zela ez ulertzeak sutzen ninduen. Vatikano II.ean oinarri hartuz Derioko Seminarioan apaiz eta fraide batzuek abiatutako bidea ibili nahi nuen: eliza pobrea, bertakoa, euskalduna, askatzailea. Desasosegua bikoitza zen, beraz: komunitate bezala eskas, misioari zegokionez desbidean.

Zorionez ez nintzen hola pentsatzen zuen bakarra. Areago esango nuke, orduko elkartea —Euskal Herriko eliz probintzia klaretarra— ados zegoela funtsean goiburu horrekin. Ez dut inorekin injustua izan nahi, baina praktika bestelakoa zen erabat gure begietara. Eta gogotik saiatu ginen arren, ez zegoen zer eginik. Ikastetxe pribatu bikain ederrean bizi ginen —Leioako Askartza Claret Ikastetxean—. Bertako elkartean aita nagusi izendatu ninduten, lehen aldiz demokratikoki. Hauxe zen gutako batzuek egiten genuen gogoeta: "Klaretarrok gai izan bagara holako ikasgu dotorea eraikitzeko, ipini ditzagun indarrak eta baliabideak gure herriko sektore xumeak hezteko, langileen seme-alabak, herri xeheko haurrak, eta ez sektore ahaldunenetakoak. Ez da gure zeregina handikien haurrez arduratzea. Horiek badute nora joan gu gabe. Plangintza bat behar dugu, herrira bideratua". Lau bat urte iraun genuen harik eta lau kide —Theo, Esteban, Javier eta ni neu— handik irten eta Getxoko Andramari auzoan kokatu ginen arte, hango parrokoaren itzalean.

Lehenengo helburua elkarte txikiagoa eta trinkoagoa osatzea zen, bakoitza bere lanetik biziz eta denen artean ahalik eta xumeen jardunez. Ez genuen kongregazioaren *obra elitista* batean aritu nahi, baizik gure ahalmenak besteei eskainiz. Algortako San Nikolas Ikastolan

hasi nintzen lanean, beste edozein maixu bezala soldatapean. Egia esan ez geunden Trianoko beharginen artean, Otxarkoagan edo Peñaskalen; Algortan geunden, baina guretzat izugarria zen aldaketa: beste edozein familia gisara bizi nahi genuen, gure muga guztiekin, argi utziz fraideak ginela, ez irakasle batzuk adibidez. Etxebizitzari dagokionez, ez nuen lortu nik espero nuena. Izan ere, etxea kongregazioak erosi zuen (inbertsio gisara?), eta diru-kopuru bat ere pasatzen ziguten hilero. Jabego pribaturik ezin genuenez eduki —pobrezia-botoak lotzen gintuen, fraideen artean dena da kolektiboa— nire asmoa zen fraideei alokairua ordaintzea, edo onartuz gero, etxe haren prezioa gure lanarekin ordaintzen saiatzea, jende normalak egiten duen eran. Alferrik. Ez genuen lortu, eta niri bederen ez zitzaidan batere gustatzen pribilegio hura. Opariz gurasoek erositako etxean sentitzen nintzen, lekutan zeuden apaiz langileak, baina tira: nire harridurarako beste kideek ez zuten funtsezkotzat jotzen, ez zuten fronte hori ireki nahi eta amore eman behar izan nuen.

Elkarte hark ere ez zuen gehiegi iraun. Ni ez naiz inor besteen barrunbeak epaitzeko, baina nago oso-oso zintzo ez genuela jokatu. Nik ere ez, seguru asko; adibidez, nire bihotzaren ibilerak ez nituen osorik partekatu. Hala ere ozen esan dezaket, denboraren talaiatik behatuta, prest nengoela nire bihotza estekatzeko, elkarte haren iraupena —bizimodu hura, alegia— segurtatzearren, baina soilik baldintza haietan. Esan beharra dago astindu gehiegi nozitu genituela hasiera-hasieratik. Elkartea finkatu aurretik, kide berrien sartu-irten ugari izan genituen. Nago, gure orduko agintariak kezkatuta zeudela Getxoko elkartearen etorkizunarekin, talde autonomoa bihurtuko ote zen beldur, edo batek daki; gure artean gehiegi zaletu ez gintezen, alegia. Eta hala, lehen-lehenik, ni handik ateratzen saiatu ziren, egia esate aldera modu sotilean ez. Gutxi gorabehera hola izan zen:

—Kapilau kastrense izatea dagokizu.

—Niri, zer dela-eta?

—Dakizunez, Konkordatuaren arabera, kongregazioak behartuta gaude, txandaka, premien arabera kapilau kastrenseak bidaltzeko kasernetara. Gure txanda da eta zuri dagokizu joatea.

—Baina zergatik niri?

—Horretarako adinean zaudelako.

—Badira gehiago nire adinean, zergatik ni?

—…!

—Gauza bat egingo dugu ondo baderitzozu, proposatu nuen. Nik ez dut joan nahi. Beharbada egongo da norbait, nire adinekoa, joateko arazorik ez daukana. Galde egiezu eta erantzunaren arabera jokatu. Topatuko duzu norbait.

Falta zitzaidana. Ni kapilau kastrensea, biolentziarik basatiena gauzatzen duen instituzioa bedeinkatzen, gure Herriaren ukazioa sustatzen zuen instituzioa; gainera kongregazioan biolentziaren kontrako hotsak besterik entzuten ez zirenean, borroka armatua gaitzetsiz. Besterik ez genuen behar! Prest nengoen desobedientziarako. Ez dakit desobedientzia zibila, erlijiozkoa edo militarra izango zen, baina ni prest nengoen. Ez nuen desobeditu beharrik izan. Handik hamabost bat egunera ostera etorri zitzaidan Aita Probintziala:

—Arrazoi zenuen, esan zidan. Badira beste hiruzpalau lagun zure adinean daudenak. Eurekin hitz egin dut eta inork ez du joan nahi.

—Ongi, ihardetsi nion. Nik ere ez. Beraz, kitto.

Eta halaxe bukatu zen auzi hura. Ez nuen pentsatzen, ordea, gure komunitateko gazteenak kapilautza hura onartuko zuenik, gutako inori esan gabe, besteon bizkar adostuta.

—Kapilautza onartu dut.

—Eta hori?

—Probintzialak eskatu dit eta baietza eman diot.

—Baina ez al genuen garbi komunitate hau sendotu behar genuela, eta horixe zela orain gure egitekorik nagusia?

—Bai, baina ezin izan dut ukatu eskaria.

—Tira, tira, egin ezazu egin behar duzuna.

Malo! Halaxe joan ziren urte batzuk, bat atera, bestea sartu, eta itxura txarra hartzen joan zen taldearen iraupen-ahalmena. Testuinguru horretan nik neuk ezkontzea erabaki nuen, eta handik gutxira zarratu egin zuten Getxoko elkartea. Inork ez zuen esperientzia hura jarraitu, oso errotuta ez zegoen seinale haren premia fraideen artean. Ez dakit Getxoko ahaleginak Euskal Herriko klaretarren artean oihartzunik izan duen, baliteke soilik Jexuxmariren seta izatea; ez ninduke harrituko, azken finean nik ere huts egin nuen, hola esaterik baldin badago. Ezin esan dezaket oztopo guztiak gaindituz euste-

ko gai izan ginenik. Ni ez nengoen ostera komentuetxera itzultzeko prest, eta Mari paregabearekin saiatzea deliberatu nuen. Ezkondu inor ez da bat-batean ezkontzen. Aspaldiko lagunak ginen. Lotura afektibo-sexualak estekatuta zeuden. Esperientzia, ibilera, etsipen berberak bizituak ginen biok, bazegoen komunitatea beste era batera sortzeko gaitasuna: bi-biok geneukan ordea irarria bizitzaren esanahia besteen alde jardutean dagoen ideia, eta nik bederen hori besterik ez nuen ikusten, alegia, norberak horretara mugatu behar duela, bestea, hurkoa —emaztea ere bai— edozeren gainetik jartzera, nork bere burua ukatuz, edo hobeto esanda, nor bere buruaz arduratzea besteaz arduratzea dela uste izanik. Horixe zen ni, neuretzat, maitasunaz uler nezakeen bakarra, apaizgoa uzteko sintesi biluzia. Maitasunak niretzat ez zeukan beste aurpegirik. Ilusioa, lilura, luzea eta gozoa izanda, ia hogeita hamar urtekoa, eta kartzelako ziega ilunean desegin da, lau horma zurituen artean zapartatua, txorino galdua bailitzan.

Ez nolanahi horratio. Han barruan ez nuen nire bizia efikaziaz, batbatean, itzaltzeko modurik aurkitu… saiatu nintzen arren. Ausardia ere behar da, eta nik ez nuen behar bestekorik izan. Utz dezagun atal hau bere horretan. Nire adiskiderik adiskideenek ere ez dute kapitulu horren berririk. Noizbait zentzatu nintzen, ostera jabetu naiz nire buru larriminduaz, eta prest nago amaieraraino joateko. Gogorra, ezin gogorragoa suertatu zen niretzat ulertzea, funtzionario ez izateko borrokan jarduten nuen bitartean Jainkoaren funtzionario nintzela (hau zehatzago ulertu nahi duenak liburu hau irakurri beharko du: *Clérigos*, Eugen Drewermann, Trotta 1995), alegia nire bizitza osoa Beste baten aginduetara zegoela, eta besterik ez nuela ikusten, eta ondorioz, besterik ez nuela nahi niretzat. Besterenduta nengoen, alienatuta. Jainkoaren zerbitzari, mezulari nintzen erraietaraino —hori baizik ez behar bada, izan ere gustura ibili bainaiz Je-

sus Nazarethekoaren bidetik, ustez hari jarraituz—. Besteak salbatu nahi nituen. Fin esateko nire bizitza funtzio bat izan da, ez bereburu. Hala ulertu nuen nik nire bizitzaren esanahia, eta benetan ulertu nuenean zer gertatzen zen, sentimendu guztiak parrastan abiatu ziren, maitasunetik gorrotora, gorrototik oreka berrira eta orekatik auskalo nora. Neuzkan segurtasun guztiak pikutara joan ziren, betidaniko barne-batasuna txikituta. “Gizaki bat naiz, besterik ez, nire buruaren bila nabilena”, entzuten nuen danbaka nire odol-jarioan eldarnioa baretu zenean. Horrek guztiorrek erlijioarekiko desatxekimendua ekarri dit. Ez nolanahi ere hori, baizik umezurtz-sentimendu erabatekoa nozituz.

Getxoko egoitzan ezagutu nuen errepresioaren lehen ausikia. Goiz aldea zen, ohi duten bezala, txakurrak durundiaz sartu zirenenean gure etxean. Lozorroan nengoen, kide batek nire logelan sarturik esnatu eta jaikiarazi ninduenean: ”Jexuxmari, polizia dago behean, linterna-argia gure leihoetara botaz”. Brastakoan jaiki, galtzak jantzi eta pisuko atean geneuzkan danbaka. “Utzi, ni naiz hemen aitanagusia, neronek irekiko diet atea”, esan nien kide izutuei, eta hala, amen batean, hormaren kontra nengoen, pistola garondoan “Hau da Zalakain”, entzun nion esaten patruilako buruari. Etxea arakatu, nahastu eta konturatu orduko San Mameserako bidean geunden. Gordonizko komisaldegian galdekatu ninduten. “Hau ezagutzen al duzu?”, “Beste hau nor da?”, “Zer egiten duzu han eta hemen”. Huskeriak. Bazekitena. Halako batean gelaren erdi-erdian paraturik, madero batek, kaleko jantziz, sartu eta bira egiten zidan soinaren inguruan, aurretik pasatzean begietara begiratu, eta saihetsean kolpetxo batzuk emanez esan zidan. “Lasai, guk ez ditugu reverendoak torturatzen”. Ez ninduten ukitu. Galdetzaileak, jesarrita eta oinak mahaian bermatuta eskatu zidan: “Esan dakizuna”. “Zertaz, ordea?, nik. Eta berak, nire isiltasunaren aurrean zakar: “Ezer ez daukazuenak zarete okerrenak”.

Etxera ekarri ninduten. Ondo idatzi dut: autoan sartu eta etxe-atarian laga ninduten, "egun on" opatuz. Sekula ez dut jakin zergatik eraman ninduten, zer bilatzen zuten, zeren peskizan zebiltzan. Ustez ez nintzen inon nabarmentzen garai hartan, alabaina norbaitek bazekien zerbait nitaz. Orduko hartan alferrik saiatu nintzen asmatzen zer bilatzen zuten nire etxean. Auzoko okinak esan zidan: "Azken boladan tipo susmagarri bat zebilen espaloi honetan, eta zuen pisuko leihoetara begiratu ohi zuen. Jadanik desagertu da". Nirekin bizi zirenetako bi ere eraman zituzten Gordonizera, beste auto batean. Galdera guztiak nitaz zirela aitortu zidaten irteeran. Handik aldi batera doi, Bilboko Plaza Zirkularrean semaforoa gurutzatzen ari nintzela, Nafarroa kalearen goiko partean, torturarena aipatu zidan madero berbera sumatu nuen nire alboan, semaforo berbera gurutzatzen-edo. Orain nagoen tokian egonda, detenitu nindutenek dagoeneko esango zuten: "Ez genbiltzan oso oker, ez mutilak?". Gordonizeko komisaldegitik bertatik atera naiz Soto del Realera hogeita hamar bat urte geroago.

## *Kartzelako-txokoan, beti erne (9)*

*Igor etxera joan da, sei urte ordainduta. Pozik eta urduri, bere neska-lagunaren bila, gurasoen besoetara. Laster, lehen egunak edo asteak pasata, lanera. Zortekoa da mutila: emaztea, etxea eta lana. Dena borobiltzeko, bidean dagoen haurra. Borobila. Merezi du. "Faltan hartuko zaitut", esan diot besarkatuz. "Nik ere bai", erantzun dit, "plazer bat izan da". Urtebete egon gara elkarrekin, "izatezko bikote" ia, agintariek hola erabakita. Bikain konpondu gara. Bi belaunaldi, bi izaera, bi historia; kartzelaldi berbera, ordea, elkarren ondoan bizitzeko aukera emanez. Bi egun baino ez dira pasa. Arantzaren ondoan esnatuko da, eta nik, faltan hartzen dut, inbidia diot: berak badaki zergatik. (...)*

*Nola esaten zaio lokutoriora datorkizun lagunari lasai egoteko? "Berehala kalera, luze baino lehen ez dugu etorri beharrik izango", esan dizu, eta zu poker aurpegiarekin: a bai? "Telebistan esan dute etxera etortzea eskatu duzuela", eta zuk: "Egia da bai, guk ere entzun dugu, batzuk guk-geuk baino lehenago enteratzen dira". "Ba... kanpoan uste dugu iritsi dela kalera ateratzeko unea". "Ondo, oso ondo egiten duzue. Hori da bidea, baina hartu lasai. Lehenengo gaixoak, gero kartzelaldia beteta daukatenak, ondoren 3/4ekoak, eta hala. Ez da irteera masiborik begitantzen". Eta zu ohartzen zara lagunaren ilusioari ur-parrastada hotza bota diozula: deseroso sentitzen zara. "Egon lasai eta saiatu", jarraitzen duzu, baina lagunak galdu du hasierako garra. Nola esaten zaio lagun minari oraindik itxaron beharko dugula? (...)*

*Gaizki hasi da guretzat udaberria. Auzitegi Konstituzionalak legezko jo du Parot deritzan doktrina. Zenbat amorru pilatu omen da egunotan guraso eta senideengan, zenbat kidek ito behar izan ote ditu malkoak izaren artean. Luxiano Izagirre zendu da Cuban. Tristuraz lepo geundelarik, albiste onak: hiru kide kalera, eta gure Txomin bi aste barru*

*egongo da libre, 19 urte osatu ondoren. (...) Txominen malkoak. Gordina da mutila baina sentibera ere bai, eta oso latza egin zaio guri jakinaraztea, gu barruan utzita. Ulertu dugu arrangura, baina handiagoa da bere askatasunak ematen digun poza. Gutxienez badugu motiboa Aberri Eguna igandean ospatzeko. (...)*

*Osasuna desorekatu zait: kolesterola eta triglizeridoak deskonpentsatu zaizkit. (...) Urteko probak egiteko unea iritsita, ospitalera eraman naute pikoloen kanguroko kaiola estuetan, eskuak lotuta. Mugitu da autobusa, kanpora begiratzen duzu, txoferraren astinduekin burua txaparen kontra lehertzeko arriskuan. Leihoa sare trinkoa da, asko jota eguzkiaren distira pasatzen uzten du. Gaur suertea egon da, hiru lagun baino ez gara etorri. Neroni atera naute lehena: pikoloa aurrean, pikoloa atzean, pikoloa aldamenean, eskailerak, aszensorea, korridorea, itxarongela, kontsulta, arnasa-probak, X izpiak. Eskubilurrak kentzeko eskatu du medikuak, pikoloak baietz; doktore andereak fonendoa pasatzeko kortina bota du, pikoloak ezetz, irekita behar duela. Bukatu denean, ostera autobusera. Garondoan, pazienteen begirada. Pikolo batek besteari, niri buruz: "a chiqueros, no?". Alua!! (...)*

*Esan didatenez, atzo aurkeztu zuten guri buruzko pelikula dokumentala: "Barrura begiratzeko leihoak". Kideak George Clooney deitzen hasi zaizkit. Tolosako Leidorren egindako emankizuneko txartela gorde dut: hunkigarria, zoragarria, ederra, dotorea omen da. "Nola hitz egin duzu?", galdetu dit ilobak. Telefonoz, maitia. Hortik aurrera Enararen trebezia montajea egiteko. Kalean egon arte ez dut ba ikusiko! (...)*

*Mikel eta biok bakarrik gaude eskolan. Ramadanaren bigarren eguna da eta musulmanak tokia hartzen hasi dira. Ahmed begiak liburutik altxatu gabe dago, Noori Korana irakurtzen buruan zapi koadroduna ipinita. Korana nirea da, baina bereak baino letra handiago duenez,*

*eskatu egin dit mesedez. Hamaikak aldera dozena bat gizaseme sartu dira, gehienak mahai zabalaren bueltan jesarri dira, bakar batzuk alfonbretan. Gidaria sartu denean, Mimoun, abiadan eta erabakimenez predikua egiten hasi da. Deus ezdiot ulertzen, arabieraz ari baita. Gero eta sendoago hitz egiten du, eta ezinezkoa egiten zait Martin Arbezuren abenturei jarraitzea. Errespetuz entzutea erabaki dut. Sarri aipatzen du profeta eta Ala, erretolikaren murmurioan nabaritzen baitzaio. Gaztelaniaz hasi da neskatilei buruz hitz egiten, ahal dutenaz eta ez dutenaz. Alde egin dut, badaezpada, odola bor-bor sentitzen baitut. Hobe eguzki pixka bat hartzea. Ordubete egon dira. Abu Bekr adiskideak esan dit bera zoriontsu dela Ramadanean. Albaniarra da, hango askapen-gerran ibilia. Bizar luzea darama, esaten dit gaitzetik babesteko dela, babes horrekin errazago dela bekatu-tokietan ez agertzea. Sotana-garaiak gogoratu dizkit. Ramadana bukatuta, sei eguneko baraualdia egingo duela gaztigatu dit. Mohamed profetak halaxe egiten zuelako. (...)*

*Ez dakit nor den. Ez dut ezagutzen. Aurpegia ere ez diot ikusi. Egunero, goiz eta arrats, bazterrean botata pasatzen du denbora. Jaiki orduko eskailerak jaitsi eta patioko hormaren kontra etzaten da. Ez dagoela ondo, diote musulmanek. Saiatu direla baina ez duela inoren laguntzarik onartzen. Ez du inorekin hitz egiten. Orduak eta orduak ematen ditu etzanda, hormigoiaren gainean: praka argiak lohiturik, sudadera urdina soinean, kapusaia aurpegian okotzeraino. Aldamenetik igarotzean ez da mugitzen, eguzki galdatan. Batzuetan eskuak luzatzen ditu, hatzak higitzen. Zer egiten du gazte honek hemen? Zergatik jokatzen du horrela? Normala al da gazte bat inorekin mintzatu gabe bizitzea? (...) Bitartean Josu Uribetxebarriak ospitalean jarraitzen du, fiskala tematu delako haren askatasuna berandutzen. Bi ospitaletan diagnostikatu diote metastasia; gure kartzeleroentzat indicios leves. Txapeoa egin dugu, baina ez gara oso fin ibili. Hurrengoan hobeto.*

# -III-

Orain zer? Orain hotz egiten du, eta barruan min. Bizitza osoa talde baten altzoan egin duenak ez du debalde uzten babestokia. Niretzat beharrezkoa izan da nire burua hobeto ezagutzeko, eta kartzelako bakardadea, isiltasuna, zer esanik ez. Gezurra dirudi kartzelari alde ona aurkitu ahal zaionik, baina halaxe suertatu zait niri.

Kongregazioan bazegoen *promesa kontsolagarria* zeritzan sekretutxo familiarra, alegia, Amabirjinak Claret fundatzaileari jakinarazi omen zion, ezen elkarte barruan hildako guztiak salbatuko zirela, hots, zendu ondoren, betiko atsedenean biziko zirela. Txatxukeria izan daiteke, noski, baina horretan sinetsi duenarengan arrastoa uzten du. Politta zen horretan sinestea, bizitzan gertatuak gertatu, zintzo jokatuz gero, azkenean *esku leunak* jasoko zaituela, nola ez dakizula baina ziur gertatuz. Ai egia balitz! Nago bizitzak toki gutxiago uzten diola fantasiari.

Nik ez dakit nola iritsi naizen egungo egoera honetara. Dakidana kontatu dizut. Merkea dirudi “Gizaki bat besterik ez naiz” esatea, baina nik garesti ordaindu dut, izan ere bizitzako gauzarik sinpleenak baitira ulertzen zailenak: adibidez bakarrik gaudela, eta ez garela inoren mezulari. Inork ez gaituela bidali, alegia. Behingoan heldu naizela ondoriozta daiteke idatzitako guztiaz, utzi diodala meneko izateari, horixe besterik ez dela gu guztion patua. Bada bai, neurri batean halaxe da. Baina soilik zentzu batean. Izan ere herri bateko semea ere banaiz, eta nire alea jarri nahi nuke berorren askapen-prozesuaren ildo irekietan, noizbait loratu dadin. Alde horretatik ez naiz erabat bakarrik sentitzen, beste askoren kide baizik, proiektu berbe-

rean nahastuta, nolabait eta erraz esatearren. Aitor dezadan sendo, ausart eta eraginkor sentitzen naizela proiektu komunean, izan ere norberaren zalantzak korronte komunean uzten dira eta ur-laster askoren arteko erauntsian disolbatzen. Proiektua pertsonala, eta soilik pertsonala denean, aldiz, ez daukazu non bermatu, ez daukazu besteenganako konfiantzaz jokatzerik, apustu huts eta irenskorrean jokatzen duzu den-dena, eta hor herbal, ezindu, zalantzakor eta galdu samarturik sentitu izan naiz beti. Deseroso. Elkarlana eta norberaren esparru propioa jorratzen konfiantza ikasi beharra daukat, ez omen dira-eta gauza bera. Bi alor ezberdin horietan aise mugitzen ez dakit, eta gainera galdera potolo batek estutzen nau sarri. Non geratzen da orain, non estekatzen da, besteen —eta herriaren ala norbanakoren baten— alde bizitza bera emateko aukera: hots, besteen kausa, norberaren aurretik jartzeko aukera?

Kosta egiten zait sentimenduak eta pentsamenduak bereiztea, teorian erraza den arren —sentimenduak, natura; pentsamendua, kultura—. Eta hori ere ikasi beharra daukat. Itzuli berri dudan eleberrigile katalan ospetsuetariko Josep Plak dio: “Gure adimenak beti konspiratzen du gustukoa dugun eta menderatzen gaituenaren alde”. Norbaitek adierazi du bizitzaren txarrena dela konturatzea zerbait ikastean beti berandu gabiltzala. Nago halako zerbait gertatzen ote zaidan! Urrats bat eman dut eta ez da ttikia; alegia, sentimenduei bide eman behar zaiela usaindu dut. Nire betiko irizpideak arriskuan jarri ohi zituzten ideiak uxatzen ibili naiz, eta hala jardun dut hamarkadatan, kontsideratu ere egin gabe hainbat gauza, bide zuzenetik, hartutako ibilbidetik, bazter ninduketelakoan alboratuz, zapalduz, erreprimituz. Orain nire barne-uretan haiek lasai ibiltzen uzten hasi naizenean, kosta egiten zait nire-niretzat hartzea. Arrotz, igartzen ditut. Sentimenduak ezin dira erauzi, ezin dira ukatu, alferrik delako eta beti itzultzen direlako: daude edo ez daude, eta baldin badaude

kudeatzen jakin behar da (sentimendu elaboratuak, egokituak?), hori besterik ez zaigu geratzen. Arriskutzat hartzeko ohitura dut, nire oreka galarazten didatelako-edo, baina zer egin? Baldin badaude zer adierazi nahi didaten entzun eta aztertu beharko da. Galdera asko ditut eta erantzun gutxi. Egoera lazgarria, betidanik erantzun ziurra aurkitu duen batentzat. Bere hartan utziko dut oraingoz. Izan ere liburu hau ez da tratatu bat, bizipen batzuen kontaera baizik ez.

Kide preso batek On Ibrahim Tormentatua deitzen nau bere korrespondentzian, eta berak uste baino arrazoi gehiago dauka. Berak ez dakiena da gaztetan irakurri nuen lehen liburu serioa "*Beldurra eta Dardara*" izan zela, eta Sören Kierkegaarden liburu hark dezente markatu nauela: Jainkoak Abrahami bere seme Isaak hiltzeko eman zion agindu absurdoa, patriarka handiaren —hiru erlijio monoteista handien patriarka nagusiaren— sinismena neurtzeko agindu absurdoa. Absurdoaren lilura! Goragoko orrietan ere esan dut, nik-neuk sintesi xinplearen ardatzean funtzionatu dut: sinestea konprometitzea da, eta konprometitzea maitatzea, hots maitatuaren alde —dela pertsona bat, herri bat, egoera bat, izate bat— kokatzea. Kitto. Ez beste bueltarik eman. Gaztetan, 70eko hamarkadan hiruzpalau aldiz igo nintzen Lyon ondoko Taizé herrixkan kokatutako monasterio multikonfesionalera: sinesmena era berrituan bizitzeko asmoz, mundu osoko gazteria konprometitua ezagutzeko eta bide batez bidaiatzeko. Halako batean Roger Schultz abatearekin hitz egitea eskatu nuen, baraualdia egin ondoren (kanpin-denda batean lautada elurtuan). Haren ezinean Anaia Eric eskaini zidaten, eta berak San Agustinen esaldi ospetsua adieraziz uxatu zizkidan garai hartako zalantzak: "Maitatu, eta gero egin nahi duzuna".

Maitasuna, ordea —errealitatera jaitsita, eta nire bizitzan maitasunarekin kateatu ditudan beste hainbat elementu kontuan hartuz— aise

korapilatu zait. "Agindu berri bat eman nahi dizuet. Maite ezazuela elkar nik maitatu izan zaituztedan bezala". Horiek dira Jesusen hitz ederrenak eta horiek betetzen saiatu naiz, alafede, indar, gogo eta erabakimen osoz. Baina nago... literalkiegi hartu ote ditudan, alegia, agindu bat bezala, hots, betebeharra bailitzan. Jakina, gauzak hola hartzearen erantzukizuna, eta beharbada errua, nirea da, ez beste inorena. Seguru aski estuegia naiz nire buruarekin eta ziur nago maitasuna sentimendua ere izan dela nire bizitzan eta jardunean, baina beharrizana oroz gain (agindu berri bat). Drewermann psikiatra eta fraide redentorista alemanaren liburua (Clérigos) irakurriz piztu zitzaidan argi bortitz eta gupidagabea, artean pankartan nengoela, UPVko atarian. Orduz geroztik haren labana zorrotzak ebaki ditu nire barruko ehunak banan-banan gaurdaino. Irakaspen gordinegia niretzat, neke eta oinazetan irentsi dudan botika garratza, baina irakaspena azken buru. Ez al da alferrik izango!

Zoriona. Nik ez dut sekula nire zoriona bilatu, uste izan baitut zoriona esplizituki bilatzen ibiltzeak galbidera daramala. Zoriona emaitza da, bizitzaren eta zintzotasunaren hondarra, betiko geratzen den zaporea. Halaxe uste dut orain ere, nahiz eta, ikusiak ikusi, batzuetan oldartzen naizen ondorio horren aurka. Ze demontre! Sintesi berritua eginez, esango nuke ezen bizitza duinki bizitzeko besteen —pertsona izan zein proiektu— alde jokatu beharra dagoela, pertsona duina izatekotan; zure arima, kontzientzia, saldu gabe ordea. Besteekiko erantzukizuna eta norberarekiko askatasuna. Biak batera. Horrelaxe laburbiltzen da nire oraingo ustea: alegia pertsona duina da, hurkoa —hurko kolektiboa ere bai— erdigunean ipintzen duena, nork bere burua ukatu gabe. Sakonean etika horrek kristautasunarekin zerikusirik ez duela esatea gehiegitxo litzateke, hala ere. Nik orain holaxe dakust. Zoriona, etorri behar badu etorriko da. Erabat ezezaguna ez zait, edozein moduz. Horrek ez du ezabatzen

agindua; aldea da agindu hori, egotekotan, norberaren baitatik datorrela, ez kanpotik. Norbaitek esango du kontzientziak ere agintzen duela, Jainkoak baino bortitzago sarri. Jakina, kontzientziak agintzen du, eta kontzientzia hezi egiten da, norberaren bizipenen eta esperientziaren materialekin. Nola daukazun moldatuta halaxe jokatuko duzu, zintzo izatekotan...

*"Barrura begiratzeko leihoak"* dokumentalean honelaxe utzi dut esanda: "Ez dakit zer gehiago utzi beharko dudan behingoz neureburu sentitzeko. Askatasuna prozesu iraunkorra da, ez dago puntu batean eta horrek bizitza osoa hartzen du". Beraz, geroak erranen...

## *Kartzelako-txokoan, beti erne (10)*

*Boki bati ez zaio gustatu H2000Eko irudi bat. Aleak irakurrita eskolan uzten ditut, eta oraingoan norbaitek kontrazala moztu eta kortxoan eseki du. Bokia sartu eta kendu egin du eta niregana hurbildu da. "No lo quitará porque le molesta", esan diot. "Molestar no es la palabra", berak. "Qué es lo que no le gusta de esa hoja", nik. "No le molestará el de la derecha?" (Uribetxebarriaren eskuinean Galindo ageri da). "La verdad es que me molesta más el otro" (Josu). "Pues no hay ni comparación". Zorrotz eutsi dio irribarre behartuaz. "De todas formas, parece que quiere culparme de colgar esa foto", nik. "Pues porque ninguno de estos dos habrá sido", nirekin zeuden beste biak seinalatuz. "Pues le aseguro que yo no ando pegando papeles". "Usted o alguno de sus compañeros". "Si es capaz de creerme, le aseguro que no". Ahots apalez eta lasai joan da dena. Ondo eutsi diogu erronkari. "Los papeles no delinquen y si alguien ha considerado que esas fotos conviene verlas.... Además se trata de una revista que ha sido intervenida previamente". "También entran cosas ilegales y pasan todos los controles, ud. lo sabe." "En eso tiene razón", onartu diot, "pero no es el caso; tendrá que ascender a controlador". Horri ere dotore eutsi dio, beharbada gehiegi arriskatu naiz. Kontrazala tolestu eta eraman egin du. Gaurko niri buruzko txostenean ipiniko du.*

*Aspaldiko partez Landerrekin nago. Mikel joan da etxera. Oier beste modulu batera eraman dute, eta biok bakarrik gaude aspaldiko partez. Azkeneko bi urte hauetan behin eta berriro aldatu gaituzte: ziega batetik bestera, goiko solairutik behera, behetik gora, 47tik 22ra, 22tik 31era, 31etik 46ra. "Por motivos de seguridad". Seguridad, eta gure artean aldatzen gaituzue? Barre egin du bokiak. "Cosas de Madrid". Ondo halere, de Madrid!! (...) Ez da berdin beheko pisuan ala goikoan egotea. Behekoan aurreko moduluaren horma ikusten duzu leihoa zabaltzean; goikoan, eguzkia, mendixkak eta soroak. Alde ederra. Aldaketa hauek gu izorratzea eta desorekatzea beste helbururik ez daukate: gauza guztiak*

*bildu, bizkarrean hartu eta eskaileran gora edo behera eraman, txabolo berrian sartu, txukuntzen hasi, atondu, berriro kokatu, hurrengora arte." (...)*

*Egun handia. Estrasbourgek atzera bota du "doktrina". Ahal izan dugun bezala ospatu dugu: gazta, txorizoa, urdaiazpikoa, alkoholik gabeko garagardoa, Landerrek egindako tarta.(...) Apustu eginda neukan hau behintzat irabaziko genuela. Zailago ikusten dut kondenak ordaindu gabe ateratzea. EHan jende asko dago pozik, barruan zer esanik ez. Merezi genuen garaipen hau. Indarrez eta ausardiaz irabazi egiten dira erronkak, batzuetan. Legeak beti dauzka zirrikituak borondatea dagoenean. (...) Kideak banan-banan edo multzoka ateratzen ikusten ditugu telebistan. Zerrenda osoa daukat eta gorriz markatzen ditut irtendakoak: Raul, Jokin, Kitxu... Onerako edo txarrerako bide luzean sartu gara, aldebakartasunekoan, orain ezin dugu negoziazio-klabean pentsatu, epe motxean bederen. (...)*

*Nelson Mandela hil da. Dena da gorazarre. Bere garaian bizi izan balira atxilotu, torturatu eta betiko barrura sartuko zutenak ere gorazarrez lepo. Nazka pixka bat ematen du. Edozein moduz, agur Madiba betikoa! Hark idatzitako testu bat daukat begien aurrean: "Mendi handi batera igo eta gero, igotzeko beste mendi asko daudela aurkituko duzu." Ni zer nabil: mendi berrira igo nahi gabe ala justu zein mendi igo behar dudan erabaki ezinik? Agian zuk uste duzun mendia ez baita igo behar duzuna. Orain arte dena gertatu zait nik asmatu ez bezala. Beraz, lasai. (...) Errematerako Arkaitz Bellon elorriotarra hil zaigu Puerto IIIko espetxean, bihotzekoak jota, ustez osasun-arazorik gabe egonda. Zelako duintasuna eta dotorezia neska lagunak! Nik nire bihotza danbaka sentitzen dut azken asteotan, azkarregi doakit. Harry Thompsonen This think of Darkness irakurtzen ari naiz. Beagleko eskifaia, batik bat*

*FitzRoy kapitaina eta Charles Darwin, aurkitu dut abenturan. Ni ez noa ordea Patagonia, Tierra de Fuego edo Galapagoetara. Ni nire baitara noa, oxigenorik gabe.(...)*

*"Curiosa cosa, un diario: lo que se calla es más importante que lo que se anota", dio Simone de Beauvoirrek La mujer rota liburuko pasarte batean. Azken urte eta erdian dozena bat orri baino ez ditut idatzi, eta pasa... pasa dira gauzak nire baitan. Sorginak emakumeak! Virginia Woolfe-ren hitz hauek ekarriko ditut hona, irakurri ditudan bezalaxe, gaztelanaiz: "Sólo se me ocurre decir, breve y prosaicamente, que es mucho más importante ser uno mismo que cualquier otra cosa. No soñéis con influenciar a otra gente, os diría si supiera hacerlo, vibrar con exaltación. Pensad en las cosas en sí... Y su éxito dependía de que saltara vallas sin mirar a la derecha y a la izquierda. Si te paras para maldecir estás perdida, le dije; lo mismo si te paras para reir. Piensa en el salto, le imploré, como si hubiera apostado en ella todo mi dinero; y salvó el obstáculo como una gacela. Pero había otra valla después de estay después otra. De si tenía la resistencia suficiente no estaba muy segura, pues las palmadas y los gritos ponían los nervios de punta. Pero hizo lo que pudo". (...)*

*Nire irteera-data irailaren 27a da. Espetxeko zuzendariordeak baietsi dit zuzenean. Hilabete batzuk aurreratu dizkidate, sartu aurretik jarritako neurri kautelarrak kontuan hartuta. Krutwigen memoriak eta Cervantesen El Quijote de la Mancha irakurriz pasa ditut azken asteak. "Laster hasiko zara urduri jartzen", abisatu dit Landerrek. Sarrik eman dit azken aholkua: "Mundua aldatzeko ez da derrigorrez mundu osoa aldatu behar. Nahikoa da puntu txiki bat, eta mundua aldatzea posible dela obserbatuko duzu puntu horretan".*

Badira bi urte Dueñas utzi nuela. Ohikoa denez, kartzelaldi osoa beteta atera nintzen. Pakete *talegero* erraldoia arrastatuz atera nintzen, funtzionarioak ukatu zidalako gurditxoa erabiltzea. Azken mendeku miserablea izan zen, ikusita ezinean nindoala belauna minduta neukalarik. Ez daukat ahazteko irteeran bertan senide eta adiskideek egin zidaten ongi-etorri bikaina. Ez ditut hemen izenak aipatuko, baina bihotzean daramatzat den-denak. Inpresio berezia egiten du zortzi urte osoz barrutik ikusitako espetxea kanpoaldetik ikusteak. 2015eko Irailaren 27a zen, Gudari Eguna.

Laster bete genuen Castilla y León-etik Euskal Herrira arteko tartea. *Herria 2000 Eliza*ko kideek bazkari ederra eta lagunartekoa prestatu zuten Zaitegin (Araba), eta Santutxuraino abiatu ginen auzokoen harrerara garaiz iristeko: loreak, musuak, besarkadak, hitz polittak, begirada konplizeak eta manifa Herrikoraino, bertan argazkia kendu eta txanpainaz bustitako topa. Preso bat gutxiago, euskal herritar bat gehiago bere erara bizitzeko, Euskal Herri librea xede. Uste baino errazago moldatu naiz kanpoko bizitza-eredura, izan ere ez baita zaila barruan baino hobeto ibiltzea. Lagunarte gozoa izan dut egokitzeko, horixe dut ondare. Egokitzapen-arazo ttikiak kenduta, zenbait despiste ubikatzeko orduan edo espazioak neurtzerakoan, nekerik gabe moldatu naiz. Azkar, oso azkar urrundu zaizkit espetxeko xehetasunak, eta ez daude batere presente nire eguneroko bizitzan.

Bizitzak sorpresak ematen dizkigu, eta nik bat potoloa neukan zain, zorioneko UPVn. Hango ateetan hamabost urtez bizi izandako borrokaldia nahikoa ez nonbait, eta garesti ordaindu nahi izan zidaten sarrera. Kondena beteta eta zor guztiak kitatuta atera nintzen arren, inhabilitazioa neukalakoan ukatu zidaten nire lanpostura arazorik gabe itzultzea. Bertako agintariek, nire lankideei emandako hitza

jan, eta, beste prozesu judizial bati aurre egitea beste aukerarik ez zidaten eman.

Eskuzabal ibili zen Goirizelaiaren taldea niri edozein lanpostu eskaintzeko, oso uzkur eskubidez zegokidana emateko. Erakutsi nizkien epaitegietako paperak, patxadaz aztertu zitzaten, baina nire alde ipini ordez, bertako zerbitzu juridikoen jukutriei men egin eta nire etorkizuna epaitegietan jokatzera behartu ninduten, beldurtuta. Ez ditut hemen epaituko, baina zerbitzu hartako zenbait kideren mendeku-hotsa nabaritu nuen nik ukapen hartan, argi asko, bat baino gehiago pankartaldi-garaian gurekin aurrez-aurre ibilitakoak baitira. Irabazi nuen epaiketa, zorionez, eta 70 urte bete arteko lana egiten hasi nintzen; 2018ko azarora arte, hain zuzen. Ez da samurra 23 urte gelatik kanpo egon ondoren berriro eskolak emateari ekitea, baina politto nabilela esan dezaket, bai behintzat nire irudiz.

Hainbeste urte gelatik at egonda banuen kuriositatea belaunaldi berriak nolakoak diren jakiteko. Irakasleen artean galdezka ibili nintzen edozer baino lehenago, eta beteranoenek esaten zidaten, ez direla "gure garaikoak bezalakoak": umeago datozela, kontzientzia eskasa dutela, kontuz ibiltzeko bada ezpada ere. Laster konturatu nintzen ezen, Bolonia guztiak gora behera, irakasteko sistemak gutxi aldatu direla, ikasle-irakaslearen arteko ratioak urritu ordez dexente hazi direla, eta ehun bat ikaslerekin egingo nuela topo gela estu samarretan.

Hala bada sartu naiz egokitu zaidan gelara, *powerpoint*ak erakusteko tresneria prestatu dut eta 2016ko udan Turkiako gobernuak itxitako egunkari prokurdu baten irudia eskaini diet lehen mailako gazteei. Ez dute ezagutzen, jakina. "*Gauza horiek erregimen diktatorialetan bakarrik gertatzen dira*", esan diet. Hernanin *Egin* egunkariko ateak zarra-

tzen azaltzen diren poliziak erakutsi dizkiet gero. "*Ezagutzen duzue*?", nik. Ixiltasuna. Ez, ez dute ezagutzen. Hamazortzi-hemeretzi urteko gazteak dira, eta inork ez die azaldu "*demokrazia homologatuetan*" ere egunkariak ixten direla. *Euskaldunon Egunkaria* itxiari buruzko irudia erakutsi diet azkenik. Norbaitek gogoratzen du zerbait. Gaitz erdi. *Egin*eko administrazio-kontseiluan parte hartzeagatik atxilotu eta zortzi urte preso eduki gaituztela esateko gogoa eduki dut, harriduraren harriduraz. Baina ez da nire bizitza kontatzen hasteko unea. Inpresioa eduki dut gure gauzen transmisioa ez dela behar bezala egin. "*Kazetaritza, batzuetan, arriskuko ofizioa da*", abisatu diet, sarrerak, titularrak, albistearen gorputza, tartekiak zer diren, eta kazetariok nola idatzi behar dugun, azaltzen hasi baino lehen.

## Aldaketak, Euskal Herriko politikagintzan

Beste nonbait idatzita utzi dut, kartzelaldia ez dela parentesi bat. Urtetan zehar harilkatutako proiektu asko mozten ditu errukirik gabe, maite gaituztenengandik urruntzen gaitu, baina bizitzak jarraitzen du, eta kartzelako urteak bizitza horren zati dira. Asko ikasten da espetxean, batik bat norberari buruz, eta alde horretatik begiratuta eskertzekoa da. Inork ez du kartzelan sartu nahi, baina estatuari aurre egin dionarentzat, gure kasuan bestelako prentsa-eredu bat eraikiz, espero zitekeen zerbait izan da.

Kartzelaldiak, besteak beste, politikaz sakon eta patxadaz hausnartzeko aukera ematen du. Sakabanatuta bizi den presoak, ordea, hilabeteak behar izaten ditu bere iritziak kideekin trukatzeko. Joan-etorri harrigarria bezain luzea onartu beharra dauka erantzunak jaso eta material berria eskuratzeko. Ohiko gaiak aztertzeaz gain, borroka

armatua amaitu eta Euskal Herriaren burujabetasuna beste era batera planteatzeko unea bizi izan genuen guk. Desesperantea izan zela esaten badut, labur geratuko naiz: txostenak gora, txostenak behera, inork ez zekien garbi zein zen noren ekarpena, harik eta nola edo hala sastrakak garbitzen joan ziren. Erantzunak baino zalantza eta galdera gehiagorekin, lortu genuen mamiaz jabetzea eta gure iritzia azaltzea, azken erabakien zain. Egia esan behar badut niretzat sorpresa izan zen gai hura kalean serioski eta itzulerarik gabe aspalditik planteatzen ari zela jakitea. Zerbait banekielakoan!

Beste gai bat aztertu gabe utzi nuen kartzela; espetxeko lege arrunta onartu ala ez, alegia. Bagenekien bazetorrela, eta gogoan dut kideei esaten niela: "*Ez nuke nahi barruan egon gai hori erabakitzeko unean*". Lerro hauek idazten ari naizelarik eztabaida hori itxita dago: presoek argi daukate legeak uzten dituen zirrikitu guztiak erabili ahal direla kalera ateratzeko, aukera guztiak direla onargarriak damua eta kideak salatzea izan ezik. Amaitu da erresistentzia-garaia, eta denak gara beharrezkoak Euskal Herri independentea eraikitzeko. Hori esatea egikaritzea baino errazagoa da, jakina. Orain arte ez da agerian ikusten erabaki historiko horren emaitzarik. Jendeak kondenak beteta ateratzen jarraitzen du, eta laster berrehun bat preso geratuko dira barruan, oso zigor luzeekin. Imajinatzen dut une horretan hainbat gauza birplanteatu beharko direla. Estatuarekiko negoziazio politikoen aroa desagertu baita.

Bidean presoen aldeko mugimendua zatitu da; ez erdibitu, baina bai zatitu. Hasieran modu zalapartatsuan ageri zena apaldu dela esango nuke. Edozein moduz, zatiketak sortzen duen minetik harago begiratuz, beti da onuragarria jende erradikalagoa egotea mugimenduko multzorik zabalenak lo hartu ez dezan, ez dezagun. Ez dago zertan denok berdin jokatu: *("si tu l'estiras per aquí, si tu l'estiras per alla, veuras*

*que tomba..."*). Alternatibak, ordea, izatekotan egingarria izan behar du, bestela txanpainaren bitsaren antzekoa izango da luzarora.

2017ko apirilaren 8an inork espero ez zuena gertatu zen: ETAk armak entregatu eta haizkora zuhaitz bilakatu zen. Zer egia den gauzak ez direla (ia) sekula amestu dugun bezala gertatzen! "*Entregatu, nola entregatu*?, esaten genuen... 2011ko urriaren 20an utzi zituen armak ETAk, artean gu barruan geundelarik. Geroztik armekin zer egin izan da buruhausterik handiena, eta harrigarritan harrigarriena estatu espainolak ez zituela armak jaso nahi. Gutxien espero genuenean Iparraldetik etorri da erantzuna: *Bakearen Artisauak* izeneko jende-talde batek, ahaleginaren ahaleginez, militantzia-gradu gorena eta diplomazia-gaitasun eredugaria erakutsiz ETAren artsenal osoa Frantziako agintarien esku uztea erdietsi du, jendartearen txalo artean.

Armak ondoren presoak, agindu zuten Bakearen Artisauek Baiona ttipiko plazan. Eta horretara doaz, horretara goaz. Urte honetako azken bi hilabeteetako lehen asteetan martxa bat antolatu da Parisera, eta aurretik 20 kartzela bisitatuko dira. "*Giltzarria izan daiteke presoak ekartzeko*", esan dute, eta hobe genuke sinistea. Behin arrakastaz lortutakoa errrepika daiteke. Bitartean eta gero, bada ezpada ere, dakiguna eta bost egiten jarraitu beharko dugu, barruan daudena ez ahazteko, ateratzen laguntzeko.

## Jendartearen ordua

Orain, beste fase batean gaude: herritarren fasean, erabakimenez eta antolamenduz eraiki beharko den fasean, Euskal Herria estatu independente erdiesteraino eramango gaituen fasean. Ez gaude oraindik indar betean, ahul samar eta zalantzati sumatzen dut nik oraindik egoera. Catalunyan, guk orain amesten dugun formula berbera erabiliz, gertatzen ari dena ikusita, pentsatzekoa da oso fase luzea, malkartsua eta aldakorra izan dela abian jarri dugun bidea.

Kalea zapaldu orduko gehien harritu nauena da, toki guztietan entzutea, erabat aldatu direla militantzia-ereduak. Bilerak egiteko erak aitatu nahi badira, bego, aldatu dira. Teknologiak ahalbidetzen digu bilera presentzialak ez egitea; baina, niri ez esan, militantzia kalean egiten da, aurpegia emanez, tokietara hurbilduz, jendea elkartuz, bilduz. Lehen, orain eta beti, militantzia erreala da, ez birtuala.

Jendartearen ordua da, seguru aski. Ahalik eta zabalen eta anitzen aritzeko ordua, helburu bakar baten inguruan baturik aritzeko ordua: burujabe izan nahi dugu, estatu bat nahi dugu, gure erara eta gure neurrira prestatutako estatu bat. Dagoeneko badago jendartea politto biltzen ari den taldea (Gure Esku Dago). Jarraitzen utzi beharko zaio, eta gero gerokoak. Ez dakigu Euskal Herria estatu konfederala izango den ala ez. Formulazio hori patentatu du gaurko ezker abertzaleak, eta niri arrotza egiten zait. Konformatuko nintzateke Euskal Herria izaten jarraituko balu; ez soilik herria, ez soilik estatua. Edozein moduz, gaur bertan abiatu behar den arren, ez da gaur-biharko emaitza izango.

Ni tirriki-tarraka nabil, 70 urte ia-ia beteta. Aldaka bat eta bi belaunak gaizki ekarri ditut Dueñasetik. Nire genetikak ez ezik patioko

porlanak ez dit batere onik egin. Eri naiz: udan lunboziatika basatia jasan behar izan dut, eta orain-oraingoz, ezkerreko hankaren erdian sentikortasuna galdu dut (errekuperatzen ari naizena, bestalde), eta muleta batekin lagunduta mugitzen naiz, lanera joaten naiz, etab. Nire txanda ez dela iruditzen zait, baina ahal dudaneraino iritsiko naiz. Gaixotasuna ez da burura iritsi, beraz ez gaude erabat galduta. Lasai, oso lasai nago nire bizimodu arruntean. Laster lan arautua utzi eta beste zerbaitetan hasiko naiz; bilobei kasu gehiago egiten, adibidez. Aski beteta sumatzen dut nire bizitzaren katilua, beraz badut eskaintzeko. Espanturik gabe pasatuko naiz hirugarren mailara. Ez duzue lanik izango ni aurkitzen.

# **atara**miñe

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso. *2003.*

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa. *2004.*

**Kartzelako leihotik**
Joseba Arregi. *2004.*

**Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina**
Joxe Blanco. *2004.*

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza. *2005.*

**Azeri gosetia**
Kepa Etxebarria. *2005.*

**Ataramiñe kantuz**
CD. Hainbaten artean. *2006.*

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola). *2007.*

**Zimaren abenturak**
Belen Gonzalez / Kepa Etxebarria. *2007.*

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta. *2008.*

**Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar** Mahai-jokoa. Zorion Zamakola. *2008.*

**Penumbras de un ayer**
Iñaki Ojeda. *2009.*

**Preso nago**
Mikel Orbegozo. *2010.*

**Bakarmortuko kronikak**
Mikel Antza. *2011.*

**Espetxetik at**
Borxa Urberuaga. *2011.*

**Ametsen txokoan bizi baiz**
Ibon Muñoa. *2011.*

**Ametsen txokoan**
CD. Hainbaten artean. *2012.*

**Kandela bat pizteko behar dena**
Mikel Antza / Iker Moreno. *2012.*

**Fakin xokona**
Oier Goitia. *2012.*

**Sasian barna**
Xabier Makazaga. *2012.*

**Preso nago 2**
Mikel Orbegozo. *2013.*

**$Z^2$**
Mikel Antza. *2013.*

**Agurra eta ohorea**
Jokin Urain. *2013.*

**Ainarak herrira itzuliko dira**
Ibon Muñoa. *2014.*

**Urte ilunak**
Nelson Mandela (itzulpena: Ekaitz Sirvent). *2014.*

**Ilargiraino!**
Mikel Orbegozo. *2015.*

**Burdin elorri arantzetan**
Joseba Arregi. *2015.*

**Haizea eta Lizar Magikoa**
Kepa Etxeberria eta Xabier Ugarte. *2016.*

**Kuku erlojua**
Kepa Etxeberria eta Xabier Ugarte. *2016.*

**Haizea**
Hainbat egile. *2016.*

**Bidean gaude, aurrera goaz, joan direnekin**
Ibon Muñoa. *2016.*

**Kartzelako kronikak**
Jexuxmari Zalakain, *2016.*

**Axelko eta Otsoko bertsotan**
Kepa Etxebarria. *2017.*

**Udaberrian biziko gara**
Ibon Muñoa *2017.*

**Errezel berdeak**
Jexuxmari Zalakain. *2017.*

**Kartzelako denbora estuan, ziegan sartuta, Jexuxmari Zalakain leihoaren aurrean jarri eta barroteetatik barrena joan da, leihoko errezel berdeen laukian ageri zaion munduari begira. Une horretan erlojua gelditu da; denboraren baitan murgildu eta bere bizitza ikusi du: baserria, familia, seminarioa, klaretiarren anaidia, irakaskuntza, kazetaritza, kartzela... Orratzak berriro martxan hasi direnean, *Errezel berdeak* liburuan bildu ditu oroimenak. Kartzelako sekuentzia batzuek tartekatu ditu hala ere, irakurlea ere leihoaren alde horretan jartzeko. Eta amaitzeko, kartzelatik irten eta bi urtera egindako hausnarketa, beti ere bizitzaren jarioa herrian eta konpromisoan kokaturik.**



ataramiñe

**www.literaturakoadernoak.org**